1968 eta 1976 urte bitartean, Frankismo betean, apaiz talde batek Euskal Herriak jasaten zuen zapalkuntza eta errepresio basatiaren aurrean ahotsa goratzea erabaki zuen. Sermoien, idazkien, gose greben edo eta itxialdien bidez, haien herriaren eta munduaren aurrean euskal erresistentziaren ikur bihurtu ziren. Hala, bada, Espainiar estatuak, Elizaren onespenarekin, apaiz hauek errepresioaren jomuga bihurtu zituen eta, azkenean, Zamorako apaizkartzelan amaitu zuten: Eliza eta Estatuaren gatibu.

ISBN 978-84-15313-09-0



ZAMORAKO APAIZ-KARTZELA



txalaparta



# Zamorako apaiz-kartzela

## Eliza eta Estatuaren presondegia (1968-1976)

Xabier Amuriza, Juan Mari Arregi, Iñaki Aurtenetxe, Periko Berriategortua, Patxi Bilbao, Vicente Couce, Lukax Dorronsoro, Miel Elustondo, Jon Etxabe, Eduard Fornes, Alberto Gabikagojeaskoa, Mariano Gamo, Paco Garcia Salve, Felipe Izagirre, Julen Kalzada, Pablo Muñoz, Josu Naberan, Felix Placer, Martin Orbe, Periko Solabarria, Imanol Oruemazaga, Jose Angel Ubieta, Angel Zelaieta, Mikel Zuazabeitia eta Juan Mari Zulaika.

# ZAMORAKO APAIZ-KARTZELA ELIZA ETA ESTATUAREN PRESONDEGIA

## (1968-1976)

Eragilea: Kalegana
Koordinatzaileak: Angel Zelaieta eta Edorta Jimenez

TXALAPARTA

LEHENENGO EDIZIOA
Tafalla, 2011ko azaroa



TXALAPARTA ARGITALETXEA E.M.L.
San Isidro 35, 1. A
78 Posta-kutxa
31300 Tafalla NAFARROA
Tel. 948 703 934
Faxa 948 704 072
txalaparta@txalaparta.com
www.txalaparta.com

AZALA ETA BILDUMAREN DISEINUA
Esteban Montorio

MAKETAZIOA
Arte4c

INPRIMAKETA
GRÁFICAS LIZARRA S.L.
Tafallako bidea, 1 km.
31132 Villatuerta - Nafarroa

ISBN:
978-84-15313-09-0

LEGE GORDAILUA
NA. 3477-11

txalaparta

## HITZAURREA

Angel Zelaieta

GURE ASMO APALA, BAINA BIZIKI GOGOTSUA, 1968-1976 hamarkadan francotarren agintearen, Vatikanoko Elizaren eta apaiz euskaldunen artean gertaturiko gatazkaren berri ematea da. Zehatzago esateko, borroka horretan puntakoen izan zirenen testigantzak bildu nahi ditugu, bakoitzak eman liezazkiokeen ñabardurak barne. Lekukorik gehienak euskaldunak dira, bizkaitarrak ugari, eta Espainiako Estatuko zenbait ere bai.

Gertaera guztion muinean, 1969an bost apaiz euskaldunek Bilboko Gotzaindegian egin zuten gose-greba jartzen dugu: Euskal Herrian bizi zen zapalkuntza eta errepresioa salatzen zuten. Gune berean agertu nahi dugu Zamorako Konkordatu Kartzelan izaniko ihesbide-tunela eta mutina, protagonistek eurek adierazia.

Izan ere, Francoren agintearen eta Vatikanoko Elizaren konkordatuaren aurka jo zuten apaiz haiek Zamorako Konkordatu Kartzelan amaitu zuten: Elizaren eta Espainiako Estatuaren gatibu izan ziren.

Gotzaindegian gose-greba egin zuten bost apaizen aurkako sententzia oso-osorik jasoko dugu, garaiko Estatu militarizatuaren isla garbia baita.

Era berean, Zamorako kartzela-zuloko apaizek idatziriko zenbait oinarrizko dokumentu euren-eurenean emango ditugu.

Jasoko dugu, baita ere, gertaera haiek garaiko zenbait ekintzaile klerikalengan eta laikorengan izan zuten oihartzuna.

Aparteko era batez jaso nahi dugu, era berean, Zamorako kartzela inguruan sortu eta garatu zen kanpotikako laguntza taldea.

Zamorako kartzela-zuloa egoera baten hilobi eta berpizkunde baten ihes-leku izan zen.



# LEHEN ATALA
## Zamorako Konkordatu Kartzela

ZAMORA, ELIZAREN ETA ESTATUAREN KARTZELA

Juan Mari Arregi

## 1. Sarrera

Frankismoaren azken urteetan, 1968tik 1976ra arte, Espainiako Estatuan kartzela bat egon zen bereziki euskal apaiz eta fraideentzat sortua. Nahiz eta hasiera batean euskal apaizak espetxeratu, arrazoi politikoengatik kasu guztietan, gerora Espainiako Estatuko gainerako aldeetako beste apaiz eta fraide batzuk ere espetxeratu zituzten han, batzuk arrazoi politikoengatik eta beste gutxi batzuk –lau, hain justu– delitu sozialengatik. Guztiak Elizaren eta Espainiako Estatuaren, bibien gatibuak izan ziren.

Hain kartzela berezi hori Zamorako kartzela probintzialtzat erabiltzen zen pabilioi bat zen, hartarako bereziki egokitua. Horma soil batek bereizten zituen erlijiosoak beste presoak, gehienak sozialak, bizi ziren gainerako pabiloietatik. Eraikintzar hori hiritik bi kilometro ingurura zegoen, Portugaleranzko errepidean. Euskal Herritik, berriz, 400 kilometro ingurura.

Aipaturiko kartzela berezia *Konkordatu Kartzela*tzat hartu zuten 1968az geroztik, Vatikano Estatuak eta Espainiako Estatuak 1953ko Konkordatuan ebatziak eta sinatuak zituzten akordioen ondorioz.

Kartzela inauguratu zuena Alberto Gabikagojeaskoa izan zen, 1968ko abuztuan, Ordena Publikoko Auzitegiak sei hilabete eta egun bateko kartzelara eta isuna ordaintzera kondenatu baitzuen, Bizkaiko Ajuriako bere parrokian egindako sermoi bategatik, zeinetan polizien torturak salatzen zituen. Hasiera batean, Dueñasko monasterioan hasi zen kondena betetzen, baina gero Zamorako kartzelara aldatu zuten, eta horrela, Konkordatu Kartzelako lehen maizter bihurtu zen. Handik aske geratu ondoren, zeukan apaiz-destinora itzuli zen. Kartzela hartako azken apaiz presoak Jon Etxabe eta Julen Kalzada izan ziren, 1976ko martxoaren 24an handik atera eta komentu banatara eramanak.

Zamorako Konkordatu Kartzela hartatik berrogei euskal apaiz eta fraide pasatu ziren gero, aldi ezberdinetan. Hogeita hamaika bizkaitar eta bederatzi gipuzkoar. Batzuk behin baino gehiagotan sartu zituzten, isunak edo beste motibo batzuk zirela medio. Horrela, bostek birritan egon behar izan zuten, eta beste hiruk hiru aldiz. Batzuk beren sermoiengatik zigortu zituzten, besterik gabe. Sermoiotan, Euskal Langile Herriaren aurkako errepresioa, torturak eta atxiloketak ez ezik, eliz hierarkiaren isiltasuna eta konplizitatea ere salatu zituzten. Isuna ordaintzeari uko egiteagatik, injustua zeritzotelako, hilabeteko edo gehiagoko kartzela zigorra ezartzen zieten, isunaren zenbatekoaren arabera. Beste batzuk ustez ETAkoak izateagatik edo kolaboratzeagatik kondenatu zituzten, eta horiei *«Ley de bandidaje y terrorismo»* famatua bezain basatia ezarri zieten. Bost apaiz Bilboko Gotzaindegian Euskal Langile Herriaren kontrako errepresioa salatzeko gose-greba egiteagatik kartzeleratu zituzten. Azkenoi hamar eta hamabina urte arteko kondenak ezarri zizkieten.

Euskaldunez gain, Espainiako Estatuko gainerako lurraldeetako beste hamahiru apaiz edo fraide zigortu edo kondenatu ere –lau delitu sozialengatik– igaro ziren aldi horretan Zamorako Konkordatu Kartzelatik. Bost kataluniar, hiru galiziar, gaztelar bat, asturiar bat, murtziar bat, extremadurar bat eta mallorkar bat, hain zuzen.



Gehienak apaiz diozesiarrak izan ziren, bi frantziskotar, bost jesuita, beneditar bat, pasiotar bat, kaputxino bat eta eskolapio bat izan ezik.

Eliza Katolikoaren eta Espainiako Estatuaren, bi-bien gatibu ziren apaiz edo fraide horiei ezarritako kondenak iraupen ezberdinetakoak izan ziren: hilabeteko kartzelaldia izan zutenetatik hasi eta urtebete, bi, hiru, sei, zortzi, hamar, hamabi urte eta zigortutako biri ezarritako hogei urtetik gorako kondenetaraino.

Badira zenbait autore, euren informazio iturriak ezagutzen ez ditugun arren, 1973-1975 bitarteko datuak zehazten dituztenak Espainiako Estatuko kleroaren eta, batik bat, euskal kleroaren kontrako errepresioari dagokionez. Horrela, Hermet Guy autoreak honako hau dio:

«Ehun eta hogei apaiz kartzelatu zituzten edo auzi diligentzia pean jarri, 1973 eta 1975 artean soilik, eta horietariko laurogeita hamasei Euskal Herrikoak ziren. Aldi horretan bertan, guztira ehun eta zortzi elizgizoni ezarritako isunak hamaika milioi pezetatik gorakoak izan ziren».

Halaber, Anabella Barroso Arahuetes andereak dioenez, berriz, «1968tik 1971ra hierarkiak ukatu egin zuen hogeita bat diozesitako apaizak, horietarik erdiak baino gehiago euskaldunak, auzipetzeko baimena».

## 2. Nola sortu zen Konkordatu Kartzela

Zamorakoa Konkordatu Kartzela izatea nola erabaki zen jakiteko, ez daukagu ez datu ez xehetasun zehatzik. Bistakoa da, jakina, Eliza Katolikoaren hierarkiaren eta Francoren Erregimenaren arduradun gorenen arteko ituna izan zela, Vatikanoak eta Gobernu frankistak elkarrekin sinaturik zuten Konkordatuaren babespean. Batzuek diotenez, erabaki horren

atarian goi aginte militarren halako bazkari bat izan zen, Valladoliden. Nola ere izan zen, non edo non egon beharko dira akordio hura jasotzen duten aktak eta hartan parte hartu zutenen izenak, akta eta izen horiek oraindik argitara atera ez badira ere.

Antza denez, goragoko akordio hori Bizkaiko Gobernadore Zibilak Bilboko gotzain D. Pablo Gurpideri proposatu eta honek onartua izan zen. Horren argibidea Barrosok ematen digu:

*«No habiendo obtenido resultado favorable para obtener una casa eclesiástica para que los sacerdotes sancionados cumplan el arresto (conforme al art. 16 de Concordato vigente) damos nuestra conformidad para que puedan cumplir el arresto supletorio en una penitenciaría del Estado, con tal de que estén en locales distintos a los de los seglares. Aceptamos cumplan arresto en la penitenciaría de Zamora».*

Bitartean, bada kontuan hartzeko zenbait datu. Vatikanoaren eta Espainiako Gobernu frankistaren arteko Konkordatuaren akordioengatik, Elizak *pribilegio* jakin batzuk zituen. Horrela, adibidez, tribunal zibilak ezin zuen apaizik epaitu, eliz autoritatearen baimenik gabe. Konkordatuaren XVI. artikuluak zioenez, «Zuzenbide kanonikoko Kodearen 120. kanonaren 2. paragrafoak aipatzen dituen prelatuak ezingo dira epaile laikoen aurrera eraman, aldez aurretik Aulki Santuaren beharrezko baimena lortu ezean». Bestalde, Konkordatuak asilo-eskubidera jotzea ahalbidetzen zuen, zeren XXIII. artikuluak, bere bigarren apartatuan, «Gotzaindegi eta Kurien, seminarioen, parroko eta erektoreen etxe eta bulegoen eta kanonikoki eraturiko komentuen» bortxaezintasuna bermatzen zuen.

Hortaz, Poliziak uste baldin bazuen egoitza horietan sartu beharra zeukala bere eginbeharrak betetzeko, eliz aginte eskudunaren onespena behar zuen Konkordatuaren aipatu artikuluaren hirugarren apartatuaren arabera, premiazko kasuetan izan ezik. Kondena ezarriz gero, aldiz, apaiz edo fraide



kondenatuok beste presoengandik, dela sozialengandik nahiz politikoengandik, bereizita egon behar zuten. Horretarako, zigortuak komentuetara eramatea aurreikusita zegoen, hasiera batean eraman ere eraman izan zituzten bezala. Neurri horien irakurketa, baina, bi instantzien arteko istilu iturri bihurtu zen.

Bestalde, hirurogeiko hamarkadan, erregimen frankistarekiko oposizioa klero nazionalista eta progresistako zenbait sektoretara zabaltzen hasia zen, batez ere Euskal Herrian. Hala, bada, Espainiako Gobernuak errebelamendu nazionalista eta progresistaren txorten horiek guztiak errotik erauztea nahi zuen. Gainera, komentuetako buruek inoiz ez zuten ondo ikusi euren komunitateak apaizen eta fraideen espetxe bihurtzea. Testuinguru horretan erabaki zuten Elizak eta Estatuak Zamorako kartzela probintziala aukeratuko zutela, geroago *Konkordatu Kartzela* deitu zitzaion hura, zio politiko eta sozialengatik zigorturiko edo kondenaturiko apaizek eta fraideek ezarritako kondenak han bete zitzaten.

Hala ere, Konkordatu Kartzela hark iraun zuen bitartean, zenbait akordio egon behar izan zuten eliz hierarkiaren eta Espainiako Gobernuaren artean arauari salbuespenak eransteko. Horrela, Zamoran kartzelaturiko euskal apaiz batzuk, aldi batean bertan egon ondoren, komentuetara eraman zituzten kondena betetzera. Gertatu izan zen, baita ere, Basauriko kartzelan preso zegoen bat, Zamorara eraman beharrean, berak nahi zuen bezala, komentura eramatea.

## 3. Jarrera ezberdinak Eliza Katolikoaren barnean

Bada esaten duenik apaiz eta fraideentzako Zamorako kartzela Gobernu frankistak inposatu egin ziola Elizari. Nola ere izan zen, ez dugu ezagutzen eliz hierarkia euskaldunak, ezta espainolak ere, ustezko inposizio horren kontra ezer adierazi zuenik kartzela haren hastapenetan. Ostera, Konkordatu

Kartzela hartan zenbait euskal apaizek 1973an mutina eta gose-greba egin zutenean bai hauteman zirela nolabaiteko jarrera ezberdinak eliz hierarkiaren barnean. Gogoratu mutin eta gose-greba hartan apaizek su eman ziotela besteak beste kartzelako kaperari, gurutzea eta beste sinbolo batzuk aparte utzi ondoren. Horren lekukotza Xabier Amurizak utzi zigun, liburu honetako beste atal batean irakur daitezkeen bertsoetan, hain zuzen.

Horiek horrela, Francisco Fernandez Hoyos jaunak, honako hau dio:

«Zamorako kartzela konponbide zaileko arazoa zen eliz hierarkiarentzat, eta anbiguotasun neurtuarekin adierazi zuen bere jarrera. Batetik, apaizentzako kartzela egotea eskandalu larria zen, besterik gabe. Kartzela hartan zeudenak giza eskubideak, Elizak bizkar eman ezin zien balioak zirenak, ozenki defendatzeagatik zeuden preso. Baina, bestalde, gotzainak ez zeuden prest Erregimenaren aurka egiteko. Vicente Enrique y Tarancon kardinalak oso ondo islatzen du kontraesan hori bere Aitorpenetan. Gotzainak ezpataren eta hormaren artean sentitzen ziren. Ezin babes zezaketen apaiz batzuen "zuhurtzia gabeko portaera", beren begietara antifrankista burubero gisa agertzen baitziren, Gobernuaren kontrako aldarrikapenak eginez eta talde klandestinoei laguntza emanez. Beste alde batetik, ordea, deseroso sentitzen ziren, Gobernuak eurei kontsultatu gabe eta euren apaizen kargu hartzeko aukerarik eman gabe egiten baitzituen atxiloketak».

Fernandez Hoyos berak dioenez, Espainiako Gobernuak suminki erantzun zien zenbait gotzainen deklarazioei eta esku hartzeari, batez ere Antonio Añoveros Bilboko gotzainarenari, eta gogorki kritikatu zuen «apaizek aldare bat erretzea zen sakrilegioa». Gobernuaren aburuz, protestak ez zeukan justifikaziorik, zeren «... Zamoran leuntasun handiz tratatzen zituzten presoak, kasik luxuzko hotel batean bezala». Gotzain izendatu aurretik Derioko seminarioan irakasle izandako Antonio Palenzuela monsinoreak, orduan Segoviako apezpiku, Gobernuaren baiezpenei ihardetsi bide zien, informazio iturri beraren arabera, *El Norte de Castilla* egunkariari egindako deklarazio batzuetan. Esku leunez tratatuak izatetik urrun, Zamorako apaizek gogortasun bereziko kartzela-erregimena pairatzen zuten, Palenzuelaren esanetan, premiaz gaineko zaintzagatik, zigor-ziegak arrazoi gabe erabiltzeagatik, banakako gelarik ezagatik edota kirola egiteko espazio faltagatik. Kazetariak galdetu zionean ea zer nahi zuen, apaizek gainerako presoek baino baldintza hobeak edukitzea, «Ez –erantzun zuen Palenzuelak– baina berdinak, bai».



Palenzuelaren arabera, Zamorako presondegiaren existentzia Konkordatua bera bortxatzea zen, «oraindik ez baitago akordiorik, giltzapeturiko apaiz bakoitzak zein eratara bete behar duen bere kondena zehazten duenik». Behin-behineko irtenbide gisa, apezpikuak proposatzen zuen espetxeraturiko apaizek kondena bete zezatela «komentuetan, Estatuak egoki deritzon arrazoizko segurtasun berme guztiekin, atxilotuek justiziaren jardunari ihes egin diezaioten saihesteko».

## 4. Kartzelaren azken urteak

Besteak beste, 1973ko mutinaren eta gose-grebaren ondorioz hasi ziren Zamorako Konkordatu Kartzela desager zedin erreklamatzen, noiz eta eliz hierarkia katolikoaren barnean arrakala handienak nabari ziren unean, hain zuzen. Fernandez Hoyosen arabera, aipaturiko urte horretan bertan, Tarancon buru zuen eliz hierarkia katolikoa Zamoran halako batean zerbait larria gerta zitekeen beldur zen. Aipatzen ari garen 1973ko horrexetako urrian, adibidez, bi gotzaini jakinarazi zitzaien «Zamorako apaizek zoro gisa zihardutela eta sekulako iskanbila sortuko zuen zerbait egiteko asmoa zutela».

Zamoran preso ziren apaizak gose-greban zeuden bitartean, ehun pertsonak, euren artean berrogei apaizek, itxialdia egin zuten Madrilgo seminarioan Konkordatu Kartzelako

apaizenganako elkartasunez. Konkordatu Kartzela bera eta apaizen atxiloketa salatzeko, laiko, apaiz eta fraide talde batek, poliziei aurre eginda, Vatikanoaren Madrilgo Nuntziatura okupatu zuen; horrez gain, ccooko buruen kontrako *1001 Prozesua*ren arbitrariotasuna salatu nahi izan zuten. Gogoratu prozesu hartako auzipetuen artean Paco Garcia Salve langile jesuita zegoela. Azkenik, Bartzelonako kristau talde baten atxiloketa salatzeko ere baliatu zuten Nuntziaturako ekintza hura. Horrela, bada, Fernandez Hoyosen arabera, aurrelari samartzat hartzen ziren hiru gotzain laguntzaile –Victorio Oliver, Jose Manuel Estepa eta Alberto Iniesta, hain zuzen– izan ziren Nuntzioaren aurrean bitartekari. Ondoren, idazki bat egin zuten, soilik euren erantzukizunaren pean, honako hau zioena: «Batzar hau egin duten kristauekin batera, Zamoran preso eta gaur egun gose-greban dauden apaizengatiko ardura sakona konpartitzen dugu, eta, egoera hau kontuan hartuz, premia handiz eskatzen dugu apaizok handik beste leku batera atera eta aplikatzen zaien zigor erregimena alda diezaietela».

Zamoran gose-greban zeuden apaiz presoen euskal diozesietatik, berriz, lagun talde zabal batek Antonio Añoveros Bilboko gotzainaren eta, halaber, Espainiako Apezpikuen Biltzarraren eta Vatikanoaren esku-hartzea erreklamatu zuen grebalarien errebindikazioen alde. Azkenik, Fernandez Hoyosen arabera betiere, gotzainek Justizia Ministerioari eskatu zioten beste kartzela batzuetara alda zitzatela. Halere, agintariek ez zieten kasurik egin, eta iruzur egiteraino heldu ziren. Gotzain batek Llanos apaizari esan zion «Tarancon kardinala harrituta geratu zela Zamorako apaizak –orduan, gose-grebaren ondoren, Carabanchelgo ospitalean– hara ez zirela itzuliko eman omen zieten berba bete ez zelako». Geroxeago, urte horretako azaroaren 8an, gotzainek azalpenezko oharra argitaratu zuten, eta aitortu zuten Konkordatu Kartzela kentzeko Espainiako Gobernuarekin egin zituzten gestioek emaitzarik ez zutela izan.



Arestian esan bezala, Zamorako Konkordatu Kartzelak 1976a arte iraun zuen. Urte horretako martxoaren 24an, hango azken biak, Jon Etxabe eta Julen Kaltzada, komentu banatara eraman zituzten, Guarda Zibilaren eskutik. Kartzelan azken preso bat lotu zen, politikarekin zerikusirik ez zuen delituren bategatik zigortua. Luze gabe, Espainiako Erresumako errege Juan Carlos I.ak uko egin zion apezpikuen hautaketan esku hartzeari eta, era berean, Eliza Katolikoak erlijiosoen kartzelari buruzko foru-pribilegioa baztertu zuen.

Juan Mari Arregi

## 1. Sarrera

Sarreran aipatu ditugunak hobeto ulertzeko, ezinbesteko deritzogu garai hartan bizi zen giroa gogoan hartzeari. Giro haren adierazgarritzat, 1969ko maiatzaren 30ean Bilboko Gotzaindegian bost euskal apaizek egin zuten greba aipa dezakegu.

Greba hura, zeinarengatik bost apaizoi hamar eta hamabi urteko kartzela zigorra ezarri zieten, *«rebelión militar»* delakoa burutu izanaz akusatuta, ez zen ekintza isolatua izan Euskal Herriaren borrokaren historian. Gertakari isolatuak izan ez ziren legez, ezta ere, Frankismoko urte haietan hainbat apaiz eta kristauk bakarka zein taldean egin zituzten ekintzak, askori kartzelara edo erbestera joan beharra ekarri zietenak. Greba hori, urte haietan izan ziren hainbat eta hainbat jokaera eta ekintza bezalaxe, Euskal Herrian diktadura frankistaren mende minez zegoen gizarte, politika eta eliz egoera osoaren loratzea izan zen. Egoera horrexen unerik garrantzitsuenak aurkezten saiatuko gara, hain zuzen, kapitulu honen hurrengo orrialdeetan.

Zamorako kartzela, Konkordatuak Espainiako Gobernuaren eta Vatikanoaren kartzela bihurtua, Euskal Herriaren

eskubide nazional eta sozialen alde borrokatu ziren euskal apaiz-fraide *errebeldeak* sosegatzeko baliatu zuten. Zamorako kartzela horretan bertan sartu zituzten Espainiako Estatuko beste alde batzuetako zenbait apaiz ere, langileriaren aldeko borrokalari antifrankistak nahiz independentistak, preso sozial moduan egon zirenak ahaztu gabe. Hartara, guztiak bihurtu ziren Eliza Katolikoaren eta Estatuaren, bi-bien gatibu.

## 2. Diktadura frankista eta Eliza Katolikoaren konplizitatea

Hala euskal kleroak nola euskal herritarrek diktadura frankistaren kontra hartu zuten jokaera Espainiako gerra zibilean bertan hasi zen jada. Euskal Herriaren zati handi bat bezalaxe, euskal apaiz asko, diktadura hasteaz batera, Francoren kontra jarri ziren edo, behintzat, ez zioten laguntzarik eman. Eta apaiz-fraideotariko askori larrutik ordainarazi zieten frankistek, Eliza Katolikoaren hierarkiako gehienen konplizitatearekin.

Hartara, kronikek diotenez, hamasei euskal apaizi ezarri zioten guda garai hartan heriotza zigorra, berrehun eta hirurogeita hamazortzi espetxeratu egin zituzten eta beste mila eta hiruren bat urrutiko elizbarrutietara edo erbestera bidali zituzten. Haien guztien *delitu* bakarra, Gobernu frankistaren arabera, doktrina nazionalistak sustatzea eta «Espainiaren batasun sakratuaren» kontra aritzea izan zen.

Aldi horretan gogoratu eta aintzat hartu beharra dago orduan Gasteizko gotzaina zen Mateo Mugikaren jarrera. Pentsamolde kontserbadorekoa izanik, hasieran onartu egin zuen Francoren Altxamendu Nazionala, baina gero, informazio hobe eta zabalagoarekin, zuzendu egin zuen hasierako jarrera. Horrela, Francesc d'Assis Vidal i Barraquer apezpiku katalanarekin batera, ez zuen sinatu apezpiku espainolek Francoren *Gurutzada* bedeinkatzeko idatzi zuten dokumentua eta, horrez gain, *Imperativos de mi conciencia* izeneko pastoral sonatua idatzi zuen, non altxamendu hura kondenatu eta bere herriaren eta, besteak beste, apaiz askoren kontra erabilitako errepresioa salatu zuen. Horrek guztiak erbesteratu beharra ekarri zion, baita Eliza Katolikoaren hierarkiak zokoratuta bizi beharra ere. Itsu azkenean, abandonaturik eta gehienek ahaztuta zendu zen, Zarautzen, 1960ko hamarkadaren hasieran. «Orain itsu nagoenean, hobeto ikusten ditut gauzak», esan zien Mugikak, hil aurretxoan Zarautzera bisitatzera joan zitzaizkion orduko hiru apaizgairi –euren artean txosten hau izenpetzen duenari– gertakari historiko haiei buruz, orduko bere jarrera berresten zuela.

Gerraondoko girora itzuliz, jada 1944ko azaroaren 23an izan zen lehenengo protesta, zenbait euskal apaizek giza eskubideen defentsan Vatikanora gutun luzea bidali zutenean (Alday, 1986-36-57). Baina 1960ko maiatzean egingo zen euskal kleroaren ekintzarik zabalena. Euskal Herri osoko hirurehun eta hogeita hemeretzi apaizek Euskal Herria pairatzen ari zen zapalkuntza-egoera salatzen zuen adierazpena plazaratu zuten. Dokumentu hartan, funtsean honako hauexek salatzen ziren, alegia, euskal identitate, kultura eta hizkuntzarekiko errespeturik eza alde batetik (ikastolak, adibidez, klandestinoak ziren) eta, bestetik, eskubide eta askatasun politikorik eza, hots, iritzi, batzar, adierazpen-askatasun, askatasun sindikal eta abarretarako eskubiderik eza. Apaizok salatu egin zuten «delitua» zela Gobernuarenak ez bezalakoak ziren iritziak adieraztea eta ez zegoela «benetako Parlamenturik, ez askatasun politikorik, ez askatasun sindikalik». Dokumentu berean sinatzaileek «disidenteek» hartzen zuten egurra eta pairatzen zituzten torturak salatzen zituzten. «Gure Herrialdeko polizi komisarietan tortura erabiltzen dute, sarri askotan garrantzirik gabekoa eta ez gutxitan bidegabea den lege baten hauslea nor izan den jakiteko metodo gisa», esaten zuten, adibidez.

Diktadura frankistaren morroi esangina zen Eliza Katolikoaren hierarkiaren erantzuna errepresioa izan zen. Sina-

tzaileetariko batzuk beren parrokietatik kanpora bota zituzten, erbestera ere bai beste zenbait, eta euretako zenbait, gerra-ostetxoko garaietan bezala, Bizkaiko Mehatzeta eskualdera. Dokumentu horren sinatzaile izan ziren apaiz gazteetako batzuek hurrengo urteetan egingo ziren eta beherago azalduko diren ekintza kolektiboetan ere parte hartu zuten.

## 3. Haize berriak Eliza Katolikoaren oinarrietan

Euskal Eliza Katolikoan eta gizartean, 1960tik 1967ra bitartean, oso gertaera garrantzitsuak bizi izan ziren, klero eta laiko katolikoen eboluzioa erabakiko zutenak. Horrela, bada, konpromiso handiagorantz jo zuten, euren talde apostoliko, sozial, sindikal eta politikoetan eratuta. 1961ean, Juan XXIII.aren *Mater et Magistra* entziklika argitaratu zen. 1962-65ean, Vatikano II.a kontzilioa egin zen, Elizaren oinarrietara eta, bereziki, beren komunitate eta herriekin engaiatuen jokatzen zuten apaiz eta laikoen sektoreetara aire berri freskoa ekarri zuena. Vatikano II.a abiatu zen urte berean, 1962an, ETAren lehen biltzarra egin zen, Iparraldean, Belokeko beneditarren komentuan. Hurrengo urtean, Juan XXIII.ak bere *Pacem in terris* argitaratu zuen. Hura hil ostean, 1963an Pablo VI.a hautatu zuten ondorengo.

Dudarik ez dago aita santuen entzikliketan eta urte horietako Kontzilioan ageri zen Eliza Katolikoaren doktrina *berriak* adoretu egin zituela eliza horretako sektore progresista guztiak, eta, bereziki, Euskal Herrikoak, egunean baino egunean irmoago engaiatzeko bakoitzaren gizarteko arazoetan. Hartara, urte haietan jada euskal laikoek eta apaizek harturiko konpromisoak talde sozial, sindikal eta politikoetan eratuta jokatzera eraman zituen batzuk, eta horrek gero klandestinitatera, presondegira eta, zenbait kasutan, erbestera eraman zituen.



Kristauei euren fedearen adierazpide gisa galdatzen zitzaien «konpromiso mundutarraren» garaiak ziren. Hala ere, apaizen artean «konpromiso mundutar» horrek, praktikan, bere mugak zituen. «Apaiz bakarrik eta denean apaiz» edo «apaiza denena eta denentzat da» eta antzeko maximez baliaturik lortu nahi zen gizarteak uste izatea apaizak ezin zirela era konkretu eta zehatzean engaiatu alderdi politiko edo sindikatu jakin batean. Horregatik, orduko apaiz asko, salbuespen batzuk salbu, talde politiko jakinen bati edo hainbat talderi laguntza ematera konprometitu ziren batik bat, taldeon barne-estrukturetan parte hartu gabe. Beste apaiz askok talde klandestinoekin lankidetzan jardun zuten haiei bileretarako lokalak utziz, aterpea eta babesa emanez, hara eta bestera eramanez, Poliziaren atzaparretatik ihes egiten lagunduz zein propaganda prestatuz eta zabalduz. Geroago, ordea, apaiz batzuek ulertu zuten beren konpromiso mundutarrak, katoliko guztienak bezalaxe, talde sindikal edo politiko jakin batean engaiatzeko ere aukera ematen ziela. Eliza Katolikoaren hierarkiak, hala ere, horren kontra ziharduen.

Erromatik zetorren doktrina berri horretan edo aire fresko berri horretan, Gotzainei eta hierarkei printzipio haiek aplika zitzaten galdatzeko helduleku ideologikoa topatu zuten euskal Elizaren sektore engaiatuek. Hala ere, Euskal Eliza Katolikoak, Espainiako Estatuko hierarka gehienek bezala, nahiago izan zuen, salbuespen zintzo batzuk salbu, erregimen frankistarekin konplizitatean jardun, bere herriarekin konprometitu baino.

## 4. Konpromiso eta jokaera indibidualak

Eliza Katolikoaren sektore engaiatuen artean jokaera gehienbat indibidualak sortu ziren, larrutik ordainarazi zitzaizkienak, isun, atxiloketa, kartzelaldi eta erbesteratzeen bidez ordainarazi ere. Nolanahi ere, urte haietan engaiaturik jokatu

zutenak ez ziren izan, ezta hurrik eman ere, egoerok pairatu zituztenak edo txosten honetan pertsonalki aipaturik agertzen direnak bakarrik. Beste engaiatu asko izan zen egoera lazgarri horiek saihestu ahal izan zituena, Polizia frankistak harrapatu ez zituelako.

Askatasunik ez zegoenez, erakunde politikoek eta sindikalek klandestinitatean jardun behar izaten zuten, eta beren propaganda isilpean zabaldu. Horretarako, leku klandestinoak behar ziren, militante langile, sindikal eta politikoak, baita orduan hasi berri zen ETAkoak ere ezkutatzeko eta propaganda «ilegala» inprimatzeko. Lehenik, makina vietnamdar famatu eta oso mugatu haiekin, eta geroago beste modernoago batzuekin, zeinak parrokiaz parrokia aldatzen ziren, Poliziak harrapa ez zitzan.

Eskubide zibil behinenak ere ez zirela errespetatzen ikusita, parrokia, apaiz-etxe zein erlijioso edo apaizgai taldeetako zenbait kide egoerak eskatzen zuen mailan egon zen eta lan horietan inplikatu zen, nahiz eta gero lan horiengatik euren burua isunen, kartzelaren eta erbesteratzearen mehatxuarekin jazarririk ikusi behar. Halaber, Polizia frankistaren atzaparretan erortzen ziren militante askoren jazarpenaren eta torturen lekuko berezi izan ziren, eta horrek batzuk gehiegikeria horiek beren igandeko sermoietan salatzera eramaten zituen. Sermoiok apaiz batzuen kontrako salaketak ekarri zituzten eta, horien ondorioz, isunak eta espetxealdiak etorri zitzaizkien. Beste kontu bat parrokia batzuetan frankistek elizkizunetara sartzen zuten bandera espainola zen, baita «Espainiaren batasunaren alde» eroritakoen alde jartzen zituzten oroitarriak ere. Apaiz askok ikurrok kentzeko borroka egin zuten, eta horiek ere jazarri egin zituzten (Madariaga, 1967).

Horrela, elizkizunetan bandera espainola erabiltzearen kontrako salaketak ondorioak izan zituen lehenengo kasua, herrian zabal ezagutu zena bera, 1966an gertatu zen. Patxi Bilbaok, Gamizko parrokian, bandera espainola elizan sartzea salatu zuen sermoian. Horren ostean, Pablo Gurpide go-



tzainak, Bizkaiko gobernadore zibilak presionatuta, hilabetez predikua egitea debekatu zion. Urte berean, «politikotzat» jo zituzten motibo eta ekintza pastoralengatik, isunak ezarri zizkieten apaiz batzuei, besteak beste, Ander Manterola, Jose Mari Madariaga, Pedro Berrioategortua eta Lukax Dorronsorori. Dorronsoro bera bizi zen apaiz-etxean, Gaztelun, ETAren V. Biltzarra hasi zen, 1966an, eta Getariako Jesuiten etxean amaitu.

Hurrengo urtean, 1967an, Juan Mari Arregiri isuna ezarri zioten Ortuellan langileei egindako torturen eta atxiloketen kontra sermoia predikatzeagatik. Urte bereko Maiatzaren Lehenean Lukax Dorronsoro eta Mikel Zuazabeitia atxilotu egin zituzten Ordiziako manifestazioan.

1968ko Maiatzaren Leheneko manifestazioan, Bilbon, Periko Solabarria, Imanol Olabarria eta Juan Mari Arregi, orduan «apaiz langileak» (Gamo, 2009), atxilotu zituzten. Ekainaren 7an, Txabi Etxebarrieta, ETAko buruzagietako bat, hil zuen, Tolosan, Guardia Zibilak. Urte horretako uztailean, Zamorako kartzelan sartu zituzten hainbat motiborengatik apaiz eta fraide batzuk: Alberto Gabikagojeaskoa, aipaturiko Dueñasko monasteriotik eramana, eta Felipe Izagirre eta Juan Mari Zulaika frantziskotarrak, biok Txabi Etxebarrietaren hilketaren kontrako manifestazioan izateagatik.

Lukax Dorronsoro eta Mikel Zuazabeitia ere kartzelatu egin zituzten, 1968ko abuztuan, 1967ko Maiatzaren Lehenean Ordizian izaniko manifestazioengatik.

Urte eta hilabete berean espetxeratu zituzten Periko Solabarria, Iñaki Aurtenetxe, Txomin Artetxe, Xabier Amuriza, Juan Jose Onaindia beneditarra, Imanol Oruemazaga eta Jose Mari Madariaga, ezarritako isunak ez ordaintzeagatik, batez ere sermoiengatik eta elizkizunetara bandera espainola eramatea salatzeagatik jarri zizkietenak.

## 5. Konpromiso eta jokaera kolektiboak

Ikusten ari garenez, 1967-1968 urteetan politika, gizarte eta eliz zapalkuntzako egoera bortitza bizi izan zen, modu berezian bizi ere. Izan ere, zapalkuntzaren azpitik eta errepresioaren gainetik, apaiz eta laikoen sektore batek, bereziki Bizkaian, ekintza kolektibo gogorragoetara jo zuen. Alde batetik, Euskal Eliza Katolikoa, interes politiko frankistengatik eta eliz hierarkiaren morrontza zela medio, lurraldetasunaren aldetik desegituraturik eta barne-loturarik gabe ageri zen. Ez zen kasualitatea Bizkaiko eta Arabako elizbarrutiak Burgosko artzapezpiku-barrutiaren barruan, Gipuzkoakoa Kalagorrikoaren agindupean, Nafarroakoa Zaragozakoari lotuta eta Baionakoa Bordelekoaren manupean egotea. Kasualitatea ez zen legez Euskal Herriko elizbarrutiak Frantziako eta Espainiako Apezpikuen Batzar arrotz bitako osakide izatea. Bestetik, Euskal Langile Herria (ELH) frankismoaren zangopean zegoen, bere eskubide berezko, sozial eta politikoak zapalduta. Klandestinitatean antolaturik, erregimen frankistari aurre egiten zioten sindikatu, alderdi politiko eta ETAko kideak jazarri, torturatu eta kartzelatu egiten zituzten.

Bitartean, eliz hierarkia, erregimen frankistarekin ados jarrita, isilik zegoen eta zigorrez erantzuten zien bere barneko apaiz edo laikoei, euron erakundeetan antolaturik, hala nola, JOC, HOAC, Herri Gaztedi, ETA, CCOO, ELA-STV eta abarretan, Frankismoaren beraren kontra, orduan bizi zen gizarte, politika eta eliz giroaren kontra eta Euskal Langile Herriaren alde altxatu zirenean (Zalakain, 2007). Egoera horretan ere, aurreko urteetan bezala, hainbat apaiz eta fraideren ekintza indibidualak izan ziren, hala nola, igandeetako predikuetan egoera salatuz. Bestalde, Maiatzaren Leheneko eta Aberri Eguneko manifestazioetan ere parte hartzen zuten, eta isunak eta atxiloketak batzen zituzten ekintza horien ondorioz.

Euskal Herri Langileak bizi zuen zapalkuntza-egoera eta horretan Eliza Katolikoaren hierarkiak zeukan konplizitatea argi ikusten zuen euskal apaizteriaren zati handi batek. Hala ere, egoera hari eman behar zitzaion erantzunari buruz funtsezko aldeak zeuden batzuen irizpidetik beste batzuenera. Bizkaian, zehazki, batzar asko egin zituzten apaiz engaiatuenek Begoñako Gogo-Jardunetako Etxean. Gauzak horrela, momentu bat iritsi zen, non, egoera batzuentzat jada jasanezina izanik, gogorrago jokatzen hasi beharra eta salaketatik ekintzara pasatu beharra planteatu zuten. Beste batzuek ez zuten hori horrela ikusten. Nikola Telleriak, gero Bilboko Gotzaindegian gose-greba egingo zuenak eta Zamorako kartzelan gaixo egon ondoren, handik irten eta laster hilko zenak, irri-puntu batez azaltzen zuen Bizkaiko apaiz-bloke bien artean gertatu zen zatiketa. «Idorrak» esaten zien ekintzarako une egokia zenik inoiz ikusten ez zutenei. «Horiek –esaten zuen Nikolak–, zerbait egin beharra dago, zerbait egin beharra dago esaka dabiltza beti, baina sekula ez dute ezer egiten...». Talde horretako buru Goikuria, Aretxaga, Lechosa eta beste zenbait ziren (Ik. Munarriz, 1908; Murua, 2009).

## 6. Gogor taldearen sorrera

Egoera ikusirik, Bizkaian, Nerbioi Ezkerraldeko apaiz eta laiko talde batek eta eskualde euskaldunagoetako beste batek, beste apaizen jarrerarekin ados ez zeudelarik, Begoñan elkarrekin biltzen hasi eta euren artean harreman eta eztabaida zehatzagoak eta ekintzei begirakoak bideratzeari ekin zioten. Talde bakoitzak bera lanean ari zen eskualdeko errealitatearen eragina zeukan, noski. Ezkerraldekoek nabarmenago islatzen zuten gizartearen egoera orokorra eta langileen errealitatea; eskualde euskaldunagoetakoek, berriz, errealitate nazionalari, kulturalari eta linguistikoari ematen zioten garrantzi handiagoa. Nolanahi ere, talde biak konturatzen ziren eman beharreko erantzunak errealitatearen alde bioi kasu egin beharko ziela. Hots, Euskal Herriko langile eta gizarte-errealitateari, alde

batetik, eta errealitate nazional eta linguistikoari, bestetik. Horretara, kontzientzia biak, nazionala eta soziala, elkarri lotzea eta kontzientzia bakarrean batzea lortu zuten. Kontzientzia horrexen eta orduko eztabaida mamitsuen emaitza izan zen euren komunikatuetarako Euskal Langile Herria, arestian aipatu dugun terminoa, sortu izana. Hain zuzen ere, Gogor taldea Euskal Langile Herriaz aritzen zen beti bere agirietan (Woods, 2001), «Gogorkeriaren aurka, gogortasuna» lelo nagusitzat hartuta.

Era horretan, ezari-ezarian joan zen eratuz Gogor izenarekin ezagutuko zen eta gero frankismoaren zapalkuntza politiko eta sozialari eta Eliza Katolikoaren hierarkiaren konplizitateari erantzuteko ekintza kolektibo gogorrenak egingo zituen taldea. Lehenengoz historian, 1967ko otsailean, abade eta fraide talde bat, laurogei inguru, sotanaz jantzita, manifestazioan joan ziren Bilbon zehar kalerik kale, frankismoaren diktadura minean, Etxebarriko Bandas de Vizcaya fabrikako grebalariei elkartasuna agertzeko, Bizkaiko gobernu zibilaren egoitzaraino, non polizien jarrera mehatxatzaileari eutsi zioten (*Trabajadores*, 1968-114).

Alabaina 1968a eta 1969a urte gogorrak izan ziren Euskal Langile Herriarentzat. Gogortu eta *findu* egin zuten errepresioa. Salbuespen-egoerak etengabeak izan ziren 1967 eta 1971 bitartean, horietariko bost Bizkaian eta Gipuzkoan, eta beste bat Estatu osoan. Ehunka euskaldunek, gizon zein emakumek, pairatu zituzten atxiloketak, torturak eta kartzelatzeak. Txabi Etxebarrieta ETAko buruzagiaren heriotza –Guardia Zibilak hil zuen, 1968an– astindu handia izan zen Euskal Herriarentzat, zeinak modu askotara protestatu zuen kalean eta eliza batzuetan. Hain handia eta zabaldua zen errepresioa eta hain estua Frankoren erregimenarekin Eliza Katolikoaren hierarkiak, Bizkaian Pablo Gurpide gotzain nafarra buru zela, agertzen zuen konplizitatea, non, Bizkaiko apaiz talde bat, berrogei inguru, birritan sartu ziren, uztailean eta abuztuan hain zuzen, Bilboko Gotzaindegian, itxialdia egiteko. Itxialdiotan



sartu zirenak gotzainari zuzendu nahi zitzaizkion, egoerari, behar zen urgentziaz, «erantzun pastorala» eman ziezaion eta Bizkaian sektore guztietara zabalduta zegoen errepresio frankistaren «salaketa profetikoa» egin zezan galdatuz.

## 7. Derioko seminarioaren okupazioa

Ikusirik hierarkiaren eta erdi-mailako arduradunen pasibotasun iraunkorra, Bizkaiko hirurogei bat apaizek, Gogor taldekoak eurak, beren jarrera gogorragotzea erabaki zuten eta, horrela, 1968ko azaroaren 4an Derioko Seminarioa okupatu zuten, Vatikanoaren esku-hartzea galdatzeko. Okupazioa segurtatu nahian, Derion biltzeko aukeratu zen kontsigna klandestinoa «lau, lau, mila» zen, alegia, azaroaren 4an, arratsaldeko lauretan eta bakoitza mila pezetarekin, mantenu eta antolakuntza gastuetarako. Okupazioa hasi eta handik lasterrera, seminarioa Espainiako Polizia Nazionalak inguratuta agertu zen.

Okupazioa, hogeita bost egunez, albiste-iturri izan zen, Estatu osoan, eta are gehiago nazioartean. *Euskal* prentsa –haren barnean gaur egungo *El Correo Español*– Gobernu frankistaren sukurtsala zen. Horrela, orduko hemengo hedabideak Espainiako Apezpikuen Batzarraren eta Aita Santuaren Nuntzioaren kondenak gizartera zabaltzeko eta apaiz okupatzaileak «errebeldeak», «separatistak», «zismatikoak» eta «Pablo Gurpide Bilboko gotzainaren heriotzaren errudun» izateaz akusatzeko bozgorailu izan ziren. Aldizkari espainol bat bakarrik gerturatu zen Deriora, *Don Quijote* aldizkaria, zeina, bidenabar, handik oso lasterrera desagertu zen, eta haren zuzendariak, Diego Carcedok, erreportajea egin zuen, apaiz «errebeldeen» eledun biri, Xabier Gorostiaga eta Juan Mari Arregiri, egindako elkarrizketaz baliaturik. Geroago, 1989an, Carcedo TVEko Informatiboetako Zuzendari nagusi izendatu

zuen Felipe Gonzalezen Gobernuak. Gotzaina azaroaren 18an hil zen, Derioko seminarioaren okupazio aldian.

Iritzi publikoan oihartzuna eragiteko, abade okupatzaileen eledunak ziren Josu Barandikak, Angel Zelaietak eta Juan Mari Arregik prentsaurrekoa eman zuten. Hori Telesforo Monzon abertzale historikoaren etxean izan zen, Donibane Lohizunen, azaroaren 4an bertan eta Derioko seminarioa okupatzen zen ordu berean (Ik. *The Times*, 1968-11-7; *Sud-Oest*, 1968-11-8 eta *Le Monde*, 1968-11-7 eta 8).

Derioko okupazioak eragin handia izan zuen, bereziki Bizkaian, bertako herri, unibertsitate eta institutuetan batzar asko egin baitziren, apaiz okupatzaileak euretan zirela. Bizkaiko klero katolikoak denetariko iritziak agertu zituen. Batzuk ez zeuden ados metodoekin, baina bai aldarrikapen eta eskabideekin; beste batzuk, ostera, ez zeuden ados ez metodoekin ez aldarrikapen eta ez eskabideekin. Gotzainaren erantzun bakarra errepresioa izan zen. Horrela, Pablo Gurpidek, hil baino egun batzuk lehenago, *a divinis* suspendituta utzi zituen, hau da, debekatu egin zien beren abade eginkizunak betetzea, hala nola meza ematea.

Okupazio aldian apaiz «errebeldeen» ordezkariak, Jose Ignacio Llaguno eta Martin Orbe lehenengo eta Juan Mari Arregi eta Martin Olazar gero, bitan joan ziren Vatikanora, Erromara, Pablo VI.a hango Estatuburu eta kristau katolikoen Aita Santu zela. Ez zituen hartu (Olazar, 1999 eta Larzabal, 1996). Hala ere, dokumentu zabala helarazi zioten goi-instantzia erlijiosoen bidez. Dokumentu hori langile-eskualdeko eta eskualde euskaldunetako, bi-bietako apaizek eztabaidatu eta landu zuten, eta Luis Mari Laybarrak eta Josu Barandikak idatzi zuten gaztelaniaz (Iztueta, 2001) eta Xabier Amurizak euskaraz. Frantsesez ere idatzia, dokumentuan «Eliza pobrea, librea, dinamikoa eta bertokoa», hots, bere Herrian sartu-sartua galdatzen zen. Aipagarria da, gure iritziz, ELH, Euskal Herrian bizi eta lan egiten zutenek osatu gisa definitzen zela jada orduan. Dokumentuaren funtsa, ostera, EHL pairatzen ari



zen zapalkuntza politikoa, ekonomikoa eta kapitalista salatzea zen. Era berean, Bizkaiko gotzaina ordezkatuko zuen Administratzaile Apostoliko bat galdatzen zen, baita gotzainak herriak esku hartuz hautatzea eta Euskal Apezpikuen Batzarra antolatzea ere. Batzarra Bizkaia, Araba, Gipuzkoa, Nafarroa eta Baionako apezpikuek osatua izan zedila eskatu zuten dokumentu hartan (Arregi, 1995).

Pablo Gurpide hil eta berehala, Jose Maria Cirarda euskal gotzaina hain zuzen, Administratzaile Apostoliko izendatu ondoren, amaitu egin zen okupazioa, okupatzaileen konpromiso zehatzekin. Konpromisoon artean ziren, besteak beste, lan zibila bilatzea Estatuaren soldatari uko egiteko, herri mugimenduei laguntzea eta euretan parte hartzea, EHLren egoera salatzea, herri mugimendu sozial, sindikal eta politikoei logistika-laguntza ematea. Konpromisook betetzeak gero haietako askori kartzelara edo erbestera joan beharra ekarri zien. Baina Jose Maria Cirarda Administratzaile Apostolikoak ez zien erantzun okupatzaileen itxaropenei. Haatik, apaizek laster ikusi zuten ez zela jakin-jakineko torturak ere salatzen ausartuko. Hori ziurtzat jo ahal izan zuten, noiz-eta okupazioan izandako apaizetako batek, Martin Orbek, Basauriko kartzelan bertan berari komisarian egindako torturen aztarnak erakutsi nahi zizkiolarik, Administratzaile Apostolikoak aztarnok apaizaren gorputzean ikusi nahi izan ez zituenean. Gainera, Euskal Herrian gero agertuko zen egoera soziopolitiko larria ikusita, beste aldera begiratzen jarraitu zuen.

Administratzaile Apostoliko izendatua izan ondoren Jose Maria Cirarda Deriora joan eta okupatzaileen ordezkari talde batekin bildu zenean, haietako batek, Juan Mari Arregik, taldekideen aurrean ozen hitz egin zion. «Apezpiku jauna –esan zion– Jesukristo bezala gurutzera igotzeko prest baldin bazaude, hau da, prest bazaude gure Herriak bizi duen zapalkuntza politikoa, nazionala eta soziala salatzeko lain izan zarelako gurutziltza zaitzaten, ziur egon atzean izango gaituzula gu guztiok» (*Gogortasuna*, 1972, x). Errealitateak, alabaina, fro-

gatu zuen Administratzaile Apostolikoa ez zela egon *gurutziltzatze* hartarako prest.

## 8. Errepresio politikoaren eta sozialaren gorakada 1969an

Aipatzen ari garen 1968ko urte haren amaieran, abenduaren 30ean, Soriako kartzelako preso politiko euskaldunek eta espainiarrek gose-greba egin zuten, preso politikoaren estatutua galdatzeko. Data berean, Espainiako Estatuko mila eta bostehun intelektualek «ohiko bihurtu ziren torturak» salatzen zituen dokumentua atera zuten.

Gogorra 1968a, eta are gogorragoa izan zen 1969a, zalantzarik gabe, errepresio politiko eta sozial handieneko urtea izan baitzen. Bi mila pertsona baino gehiago, euretarik mila inguru Bizkaikoak, atxilotu zituzten eta laurehun inguruk erbestera ihes egin behar izan zuten, euren artean hainbat langilek, erakunde sindikaletako kidek eta apaiz eta fraide mordo batek. Euskal langile-mugimendua, Bizkaikoa bereziki, birmoldatzen ari zen era bateratu eta klandestinoan, batzorde ordezkariak edo koordinadorak sortuz. Batzorde edo koordinadora horietan baziren CCOOko PCEren ildokoak eta CCOOko independenteak, UGTkoak eta USOkoak, CCOOko gazteak eta JOCekoak, ETAko Langile Frontekoak eta ETA-Berri-Komunistak erakundekoak. Horien plataformak bere eskabide sozialak eta ekonomikoak bazituen ere, beste errebindikazio politikoagoak ere egin zituzten, errepresioaren eta salbuespen-egoeraren kontra. Talde horrexek dinamizatu zituen 1969ko urtarriletik aurrera Bizkaian ez ezik Euskal Herri osoan ere egin zen makina bat huelga.

Hartara, 1969ko urtarrilean salbuespen-egoera dekretatu zuten Espainiako Estatu osoan. Testuinguru horretan, hainbat huelga egin ziren otsailean: AHVko 8.000 behargin atera ziren huelgara, eta euren enpresa, Ansio, Sestao eta Barakaldon fabrikak zituena, itxi egin zuen gobernadore zibilak.



Haiekiko elkartasunez, Navaleko milaka behargin batu ziren huelgara. Huelga Gipuzkoara hedatu zen, non Orbegozoko eta Michelineko langileak atera ziren huelgara. Jada 35.000 euskal langile baino gehiago ziren sindikatu bertikala donesten zuen lege sindikalaren aurka huelgan zeudenak. Hainbat eta hainbat langile atxilotu zituzten, euren artean Periko Solabarria apaiz langilea.

Geroago eskola-sektorea, 10.000 ikasle baino gehiagorekin, aterako zen huelgara Vietnamgo gerraren kontra, eta polizia batek larriki zaurituko zuen balaz ikasle bat. Martxoaren 2an presoen aldeko hainbat ekintza egin ziren Hego Euskal Herrian. Polizia bristi-brasta sartu zen Donostiako Artzain Ona katedrala okupaturik zeukaten 200 lagunen kontra, eta batzuk atxilotu egin zituzten eta beste batzuek erbesteratu egin behar izan zuten. Berriro okupatu zen eliza hori, eta 500 poliziak baino gehiagok bortizki esku hartu zuten. Apirilaren 6an Aberri Eguneko manifestazio ilegalak gogor erreprimitu zituzten eta atxiloketak asko izan ziren. EGIko ekintzaile bi hil ziren bonba bat manipulatzen ari zirela.

Egoera hori guztia gero eta okerragora joan zen fabriketan, unibertsitatean eta institutuetan, baita kalean ere. Testuinguru horretan, apaiz batzuek jada sermoiak talde gisa batera egitea, salaketa-dokumentuetarako firmak biltzea eta itxialdiak egitea planteatzen zuten, baina Estatuaren errepresioa egunean baino egunean gogorragoa zen, eta eliz hierarkiak bere isiltasun konplizean jarraitzen zuen. Horregatik, gero eta apaiz gehiago zeuden Polizia espainolak egin zituen operazio ugarietan inplikaturik, batez ere Bizkaian, eta bereziki, nahiz eta ez bakarrik, Derioko seminarioa okupatu zuen Gogor taldekoak. Okupazio haren oroitzapen gisa, disko bat argitaratu zen, *Gogor*, egun haietan Derioko seminarioan kantatzen ziren kantuak jasotzen dituena, okupatzaileetako bat izan zen Xabier Amurizak sortuak batzuk. Diskoarekin batera, Vatikanora bidalitako dokumentuaren laburpen zabal bat

zihoan euskaraz, espainolez eta frantsesez, baita kantuen testuak ere aipaturiko hiru hizkuntzetan.

## 9. Artekale-Mogrovejo-Katalunia-Perpignan

Inolako zalantzarik gabe, 1969ko apirilaren lehen hamabostaldian gertaturiko jazoerak, besteak beste, ETAren goi-karguetako batzuen atxiloketa, Bilboko Artekalen lehenbizi eta Mogrovejon ondoren (Europako Mendi-tontorrak), Euskal Herrian aspaldiko polizia operaziorik handiena eragin zutenak izan ziren. Jazoerok Bizkaian bakarrik mila lagun baino gehiago atxilotuak eta erbesteratuak izatea ekarri zuten, euren artean hainbat apaiz, fraide eta oinarriko kristau komunitateetako edo erakunde katolikoetako kideak.

Horrela, bada, apirilaren bederatzian, polizia tiroka sartu zen Bilboko Artekaleko pisu batera, non ETAren lau goi-kargu baitzeuden gordeta: Mario Onaindia, Josu Abrisketa, Bittor Arana eta Mikel Etxebarria. Lehen hirurak atxilotu egin zituzten, baina Mikelek Orozkorantz ihes egitea lortu zuen, laster azalduko dugunez zehatzago. Egun bi geroago, apirilaren 11n, Poliziak, atxilotu berriei tortura eta tratu txarren bidez egindako galdeketaren ondoren, ETAren gainerako zuzendaritzako kideak topatu ahal izan zituen Mogrovejon. Guardia Zibilak etxea inguratu zuen eta, tiro egin ondoren, Enrike Gesalaga, Jone Dorronsoro, Teo Uriarte eta Jon Etxabe atxilotu zituen.

Hartara, Mikelek, Artekalen larriki zaurituta, ihes egitea eta azkenean erbestera iristea lortu zuen, herritarren –eta batik bat Bizkaiko zenbait apaizen– laguntzari esker. Taxia hartu zuen San Anton parean eta Bilbotik kanpora irten zen. Arrigorriaga inguruan, Polizia atzetik zuela, eztabaida sortu zen Fermin Monasterio taxi-gidariaren eta militante abertzale larriki zaurituaren artean. Bien artean izandako indarkaren ondorioz, taxi-gidaria hilik gertatu zen. Mikelek basora jo zuen ihesi, Orozko alderantz, eta inguru guzti hura poliziaz josi zuten. Dena miatu zuten, baserriak, bordak, baita komenturen eta apaiz-etxeren bat ere. Egun batzuetan prentsa frankistak polizien bilaketaren berriak eman zituen, baita Mikelen izaera fisikoaren zehaztapen batzuk ere (gorpuzkera sendoa eta akatsen bat «r» ahoskatzean, esaterako), edonork ezagut eta sala zezan.



Mikelen ihesak eta osasun-zainketak lagun askoren eskuhartzea behar izan zuten ia bi hilabetez, euren artean zenbait apaiz eta fraiderena. Batzuek haren zauri larriak sendatzeko medikua bilatu behar izan zuten (Arregi, 2007), beste zenbaitek atzetik zebilzkion poliziengandik ezkutaturik eduki eta, azkenik, beste norbaitzuek Estatu frantsesera ihes egiteko moduko leku seguruetara eraman. Txosten hau egiten ari dena izan zen medikua bilatzen eta, Artekaleko erorialdia gertatu eta handik hilabete erdira, Mikel Frantziako Estatura Katalunian zehar mendirik mendi eramaten esku hartu zutenetako bat.

Orain jada agertu daitekeen datu moduan, zehaztuko dugu ezen Mikel Etxebarria, inork ezagut ez zezan, apaiz legez heldu zela Bartzelonara. Txosten hau sinatzen duenaren lagun batzuen etxean egotea justifikatzeko, Katalunian egiten ari ziren «jardunaldi pastoral» batzuetan parte hartzera etorria zela esan zuen.

Bilboko Poliziak, Criado famatua buru zela, ia-ia atxilotu egin zituen Mikel Etxebarria eta txosten honen sinatzailea, ezkutaturik egon ziren Bartzelonako etxean. Etxe hori utzi eta handik ordu batzuetara, ostatu emate horretan inplikaturiko familia katalana atxilotu egin zuten. Nolanahi ere, segurtasun neurriak ongi bete zituzten («Mikel Bartzelonara jardunaldi pastoral batzuetara etorri zen apaiza zen», esan zuten), eta hirurogeita hamabi ordu geroago, libre utzi zuten familia.

Operazio horrek eta berorren geroko ondorioek Poliziaren sarekadarik handiena ekarri zuten Bizkaian 1969ko apirilean eta maiatzean. Ehunka lagun atxilotu zituzten, eta laurehunek baino gehiagok, inoiz baino gehiagok batera, ihes egin be-

harra izan zuten. Guztiei aplikatu zitzaien *«Ley de bandidaje y terrorismo»* zeritzon lege sonatu eta gogorra, zeinak, besteak beste, Auzitegi Militarren aurrean epaiketa *sumarísimo*ak egitea ahalbidetzen zuen. Egunero agertzen ziren argitaraturik epaitegi militarren hainbat «errekisitoria». Atxilotuen artean zeuden jada apirilaren 23an Pedro Ojanguren, Jose Mari Ortuzar, Joseba Atxa eta Martin Orbe apaizak, Mikel Etxebarriaren ihesean parte hartu izanaz akusaturik. Jose Angel Ubieta ere, orduan bikarioa zena Jose Maria Cirarda gotzainarekin, berrogeita zortzi ordu inguru atxiloturik egon zen, inoiz prozesatu ez bazuten ere, arestian aipaturiko apaiz batzuen estalgarri izanaz akusaturik (*Gogortasuna*, 1972-10, eta Villota, 1985). Amadeo Rementeria eta Juan Mari Arregi apaizek, aldiz, ihes egin ahal izan zuten, eta Iparraldean errefuxiatu ziren beste ehunka lagunekin batera.

Geroago erbesteratu beharra izan zuten ehunka lagunen artean beste apaiz eta fraide batzuk ere izan ziren, hala nola, Paulo Iztueta, Tomas Gaztelurrutia, Luzio Aurrekoetxea, Imanol Olabarria *Zarra* eta Fermin Gongeta. Orduko Parisen ziren beste apaiz bi, Luis Mari Laybarra eta Josu Barandika, zeinak jada ezin izan ziren Hegoaldera legez itzuli. Geroago, «banda armatuari laguntza emateagatik» beste fraide eta apaiz batzuk errefuxiatu ziren, besteak beste, Iñaki Llaguno, Julio Araluze eta Jesus Sanchez. Apaizgairik ere errefuxiatu zen, hala nola, *Kapatxa* eta *Larry* ezizenez ezagutu genituenak.

*«Ley de bandidaje y terrorismo»* hark atxilotuei tortura sistematikoa aplikatzea ere berarekin zeraman. Hala ere, orduko errepresioak kalean herri-erresistentzia sortzeko erreakzioa ekarri zuen. Erreakzio horren agerpen bat Bilboko eta Iruñeko Maiatzaren Leheneko ospakizunean ikusi zen, manifestatzaileek poliziaren egurrari molotov koktelak jaurtikiz erantzun ziotenean. Egun horietan, apaiz batzuk ere zigortu zituzten. Sonatuenak aipatuz, Periko Solabarria atxilotu egin zuten,



Periko Berrioategortuari urtebeteko espetxealdia ezarri zioten eta Imanol Oruemazagari sei hilabetekoa.

Egun horietan, halaber, «banda armatuari laguntza emateaz» akusaturik, Zamorako kartzelara sartu zituzten Kepa Arrate, Patxi Auzmendi eta Imanol Gisasola jesuitak, Jose Mari Madariaga apaiza eta Paskual Intxausti pasiotarra. Banda armatuko partaidetzat hartuta, kartzelatua izan zen, baita ere, Jon Etxabe. Orobat, garai horretan hasi zen euskal preso politikoak urrutiratzeko politika. Horrelaxe, PC, ETA eta PCMLko preso asko Segoviako kartzelan bildu zituzten.

Euskal Herrian errepresio politiko eta sozial hori gertatzen ari zenean eta Eliza Katolikoko apaiz eta laiko asko ere pairatzen ari ziren bitartean, hierarkiak diktadura frankistarekin konplizitatean jarraitzen zuen, txintik esan gabe. Horrek guztiak Gogor taldeko apaiz taldetxo batengan izan zuen eragina hain erabakigarria izan zen, taldekoek, Derioko Seminarioaren okupazioan hitzartu zituzten printzipio eta konpromisoekin koherente jokatuz, gose-greba egitea erabaki zuten, egoera salatzeko. Salbuespen-egoera minean, 1969ko maiatzaren 30ean, non-eta Bilboko Gotzaindegian. Ekintza horregatik, hurrengo kapituluan ikusiko denez, hamar eta hamabi urteko espetxealdiak ezarri zizkieten.

## 10. Gogor taldearen desagerpena

Gogor taldearen zati handi eta agian dinamizatzaileena atxilotzeak, kartzelatzeak edo erbesteratzeak, alde batetik, eta Vatikanoaren eta Euskal Eliza Katolikoaren hierarkiak EHLrekiko konpromisoak hartzeko erakutsi zuen behin betiko ezgaitasunak, bestetik, mugimendu haren amaiera ekarri zuten.

Bizkaiko Gobernu Zibilaren orduko ohar batek dioenez, «*El* Gogortasuna *va perdiendo fuerza por evolución de sus miembros, pasan a una situación de centro izquierda. La vicaría general les da cargos más o menos importantes. Seculari-*

*zaciones, suspensiones, exiliados, detenidos en prisión, una defunción»* (AHGCV, 1971. Barroso, 1995-368). Batzuek, gehienek, utzi egin zuten apaizgoa, beste batzuek apaiz izaten jarraitu bazuten ere. Nolanahi ere, nork bere erara, Herriarekin arduratuta eta bertan engaiatuta jarraitu zuen, hala nola AEKren, *Egin*en, *Kaleganaren, Herria 2000 Eliza*ren, UEUren eta bertsolaritza berriaren sorkuntza eta garapenean.

Orduko girora itzuliz, 1969ko maiatzean, Bilboko Gotzaindegian, bost apaizek egindako gose-grebaren ondorengo hiletan eta 1970-1975 urteetan, Euskal Langile Herriaren aurkako errepresioa iraunkorra zelarik, apaiz eta fraideen beste jokaera batzuk ere ikusi ziren, bakarka eginak gehienak. Horiek ez ziren izan Gogor taldekoak izandakoek bakarrik eginak. Edonola ere, betikoa ekarri zieten ekintzaileei, alegia, isunak, kartzela eta erbestea.

Hartara, urte horietan izan ziren ehunka atxilotuen artean, apaiz zein fraide ugari izan zen. Horien artean Karmelo Zamalloa, Paco Garcia-Salve (bi aldiz), Felipe Izagirre (hirugarrenez), Pablo Muñoz, Luis Mari Bereziartua, Patxi Bilbao, Imanol Oruemazaga, Juan Mari Zulaika (hirugarrenez), Zipriano Zamalloa, Anastasio Olabarria, Martin Hormaetxe, Jabier Sagastagoitia, Jose Antonio Zabala, Juan Antonio Gurrutxaga, Ernesto Arako, Paxi Regidor, Jose Antonio Kalzada, Jesus Sanchez Sierra, Periko Berrioategortua, Jose Miguel Gonzalez Batiz, Tasio Erkizia fraidea eta beste hainbat.

## 11. Eliza Katolikoaren pasibotasuna ala koherentzia?

Amaitzeko, galde egin liteke ea Eliza Katolikoaren hierarkiek, hala bertokoak nola Vatikanokoak, frankismoko urteetan ukan zuten jokaera hierarkikoaren pasibotasuna eta beste aldera begiratzeko joera zeri zor zitzaizkion. Konplizatate argiaren fruitu izan ote ziren, ala apezpiku bakoitzak apezpikutza hartzean bereganatu behar zituen leialtasun printzipioekiko koherentziaz jokatu zuten jokatu zuten bezala.



Ez gara pertsonen barru-barruko gorabeheretan sartuko eta, beraz, ezta gotzain bakoitzarenetan ere. Beraz, euskal gatazka politiko eta armatuaren aurrean eta, ondorioz, bere kleroaren jokabidearen aurrean jardun zuten moduan jarduteko izan zituzten zioak ez ditugu inola ere epaituko. Alabaina, komeni da jakitea frankismoaren garaian Espainiako Estatuko gotzainak aldez aurretik Eliza Katolikoak, Vatikanoaren bitartez, eta Estatuak elkarrekin egindako Konkordatu Akordioan ezarritako prozeduraren bidez izendatzen zirela. Eta Eliza katolikoaren eta Espainiako Gobernu frankistaren artean sinaturiko Konkordatu haren arabera, gotzain bakoitzak leialtasuna zin egiten zion Estatuburuari, Estatuari berari eta unean uneko Gobernuari.

> *«CAPUT III De iuramento, periurio, adiuratione*
> *(...) In Hispania viget hoc iuramentum fidelitatis, quod in praesentiarum emittitur iuxta formulam in Concordatu italico anni 1929 a. 20 expressam: «Ante Dios y los santos Evangelios, juro y prometo, como conviene a un Obispo, respeto y fidelidad al Estado español. Juro y prometo respetar y hacer que mi pueblo respete al Jefe del Estado español y al Gobierno establecido según las leyes españolas. Juro y prometo, además, no tomar parte en ningún acuerdo ni asistir a ninguna reunión que pueda perjudicar al Estado español y al orden público y que haré observar a mi clero igual conducta. Preocupándome del bien e interés del Estado español, procuraré evitar todo mal que pudiera amenazarle»* (Zalba, MCMLIII).

Era berean, mezatan *Et fámulos* deituriko jarraiko otoitza egiten zen, Jainkoak Estatuburua eta Armada gaitz guztietatik libra zitzan.

*«Guarda, Señor, de todo mal a tus siervos; a nuestro Santo Padre el Papa, N. y a nuestro Obispo N. Guarda a nuestro Jefe*

*de Estado, al pueblo que le ha sido encomendado y al ejército y (...) Amén»* (Ik. in *BOOBI*, 1967.X, 711-712).

Frankismoko urte haietan gertaturikotik ondorioztatu beharko litzateke Espainiako Estatuko Eliza Katolikoaren hierarkia, bederen, salbuespenak salbuespen, koherentea izan zela Francorenganako leialtasun zinarekin eta otoitz horrekin.



## ALBERTO GABIKA: «ZAMORAKO KARTZELA ESTREINATZEA EGOKITU ZITZAIDAN»

Mikel Elustondo

MILA BEDERATZI EHUN ETA HIRUROGEIA DA, Eliza-giroa guztiz tradizionala zen garaia. Urte hartan apaiztu nintzen, hogeita hiru urte nituela, eta Ajurian nengoen bertako eliztarren abade. Ibarrurin zegoen parrokia. Herriak berrehun bat biztanle zituen orduan –baserritarrak gehienak–, eta hainbat auzune eliza baten inguruan. Zenbait auzotar, ez asko, lantegietara lanean hasita zegoen garai hartan.

Ibarrurin Txomin Artetxe zen nire parrokoa, abertzale zintzoa eta gizon eskuzabala. Lagun handi egin ginen eta ezin hobeto konpondu ginen bederatzi urtez, 1969an luzarorako kartzelara eraman ninduten arte. Gero, ni barruan nengoela, bera ere kartzelara eraman zuten. Gaur egun ere oso lagun jarraitzen dugu. Oso zen jendea ona Ajurian, benetan ona, gero! Bihotzean daramatzat guztiak, ni bizi izan nintzen Etxebarrieta baserriko familia berritik hasita...

Esan dezadan, idealista nintzelako apaiztu nintzela ni. Apaiz egitea herriarekiko konpromisoa betetzeko bidea zitzaidan, hau da, elkarrenganako maitasuna kristautasunaren gunetzat harturik. Baina abade egin eta konturatu nintzen Elizak ez ziola erantzuten nik gogoan neukan bide horri. Elkarri laguntzea, justizia eta gainerakoak nituen nik buruan eta 1960tik 1964ra neure pentsaera gauzatzeko denbora izan

nuen. Sakon konturatu nintzen frankismoaren kultur eta erlijio adarra zen Eliza bateko partaide kualifikatu nintzela. Eliza horrexek, oro har bederen, lagundu zion frankismoari Herria deskontzientziatzen, pribilegio batzuen truke. Nik, beste batzuen antzera, poliki-poliki eboluzionatuz, neure apaiz-egoera kualifikatua herria kontzientziatzeko, orduko borrokalari politiko eta sozialen alde jokatzeko eta langile eta ekintzaile errepresaliatuen bideari, neure neurrian, jarraitzeko erabiltzea erabaki nuen, betiere apaiz talde batekin eta gazte idealistekin batera.

Niretzako ondorioak ekarriko zituen sermoi bat egin nuen, 1964ko azaroan. Esan dut neure pentsaera gauzatzeko denbora izan nuela urte horietan eta, beraz, sermoia neure eboluzioari lotuta dago, Herriaren eboluzioari segika zihoanari.

Urte hartan, 1964an, zenbait gorabehera gertatu ziren Areatzako eskolan, Muxikan, Ajuriatik bost kilometrora. Baten batzuek eskolara sartu eta Francoren erretratua kendu zuten, bandera espainola ere kendu, ikurrina ipini, frankisten kontrako berba txarrak idatzi hormetan... Nik ezagutzen nuen apur bat Areatzako giroa, gazte talde batekin lanean joaten nintzen-eta bertara. Herri Gaztediren hasierako taldea zen.

Herri Gaztedi euskal herriko baserrietan eta herri euskaldunetan zabaldu genuen hezkuntza-mugimendu bat izan zen (Lopez, 1996-217). Talde-ekintza eta gizarte-ekintza zen hezkuntzaren oinarria. Ekintza bat egin ondoren, «berrikusi» egiten zen taldean; kide guztiek ematen zuten iritzia eta elkar aberasten zuten, eta erabilitako gaiak argitzeko liburuak eta aldizkariak ere aipatzen ziren, bakoitzak irakurtzeko. Ondoren beste ekintza bat planifikatzen zen, aurrekoan ikusitako balioak eta izandako hutsegiteak kontuan izanda, eta bakoitzak bere konpromisoa hartzen zuen. Hurrengo batzarrean, egindako ekintza berrikusten zen metodologia berarekin. Apaizak, garai horretan, eurak ziren hezitzaileak, egia





Alberto Gabikagojeaskoa garaiko argazkian

zeukatenak, eta hezkuntza apaizaren egia transmititzea zen... Herri Gaztedik, bada, irauli egin zuen hezkuntza mota hori. Eta gazteengan adina, apaizongan izan zuen eragina. Europatik zetorren hezkuntza molde berria Herri Gaztedik Euskal Herrira moldatu zuen, euskararen erabileratik hasita. Herri Gaztedik euskara zuen oinarrian. JOC taldeen inguruan zebiltzan batzuek, erdi broman eta erdi serio, zera esaten zieten: euskerizare pauperibus missit me bihurtu duzue zuek ebanjelioaren agindua (Ugarteburu, 2010). Orduan oso gaitza zen hori. Euskara ez zen idazteko hizkuntza, ez 1960ko hamarkadaren hasiera hartan. Idazten zena, erdaraz idazten zen, nahiz eta, egun, hori harrigarri samar gertatzen zaigun. Baina Herri Gaztedin gazteek hartzen zituzten ohar apurrak euskaraz idazten zituzten. Dena zen euskaraz. Erabiltzen genuen metodologia horrek, behetik gorakoak, zeharo aldatu gintuen goitik beherako hezkuntzan haziok, eta ez gutxien apaizak. Herriarekin eta gizartearekin konprometituriko jendea atera zuen Herri Gaztedik Euskal Herriko zati dezente batean.

Areatzako eskolako zera hura gertatu eta nik neraman gazte talde hartako dozena erdi mutil eroan zituen Guardia Zibilak. Eroan zituenen artean bat ez zen mutikoa, gizon egina

baino: Urretxindorra bertsolariaren semea, Balendin Enbeita bertsolaria. Mutikoak jo zituzten, torturatu... baita Balendin bera ere. Hura gertatu zenean, nik sermoia egin nuen; idatzi eta irakurri. Herri Gaztedin lantzen genuen sistemaren arabera egin nuen: gertakarien berri eman, interpretatu eta juzkatu. Gazteek eginak aipatu nituen, bai, baina baita Guardia Zibilaren jokabidea ere, neure iritzia ere emanez. Hona sermoiaren ataltxo bat...

*Gernikako Guardia Zibila:*

*Euren eskubideaz baliatuta, itaunketa egiteko deitu deutsee batzueri, euren artean 16 eta 17 urteko sei gazteri eta gizon heldu bateri. Itaunketan gazteetariko bi torturatu egin ditue eta gizon helduari aurpegiko bat emon deutsoe. Ez dabe egiaztatu errudun direla.*

*Ekintza hori ez da gizakieri jagokena, gutxiago agintari bateri; izengabekoa da agintari katoliko batengan. Ekintza horrek infragizakitzat hartzen ditu gure gizasemeak.*

*Gizakia (gizaki oro) kreazioko errege eta Jaungoikoaren seme edo alaba dala uste dogun guztiok beharturik gagoz holako injustizia baten kontra gogor protestatzera.*

*Zoritxarrez, ez da ezagutzen dogun kasu bakarra. Euskal Herriko komisarietan sarri torturatzen da azken urteotan. Bost edo sei poliziren artean hartu eta torturatu egiten dituzte gure gazteak eta helduak. Torturatzen dabiltzan bitartean, torturatuen sendiak, herria, gurasoak eta maiteen dituztenak iraintzen ditue berbarik itsusienekin.*

*Hori ez da zilegi, eskubide ororen kontra dago hori; giza eskubideen kontrakoa da.*

*Holako injustiziaren aurrean protestatzen ez dabenak ez dauko giza sentimenturik, eta holako jokaera toleratzen daben kristauak ez dau ulertu Kristok mundu honetan euki eban eginkizuna.*

*2º. Eskola dagon inguruko agintariak.*

*Ezelako motiborik barik uste dabe jazotakoa abade batengandik eta bere inguruan egiten diren batzarretatik sortu dela (susmorik egon ez dadin, abade hori neu naz. Eta batzarrak Areatzako gazteekin neuk egiten ditudanak dira).*

*Gazteori itaundu eta euretako batzuk torturatu be egin eta gero, ez dabe errurik aurkitu abade horregaz (nigaz) batzen direnengan.*

*Halan be, herri honetako agintariak (batzuk) presioa egiten dabiz batzarrok amaitu daitezan.*

*Zer esan horreri buruz?*

Espainiako Barne Ministro zenari, Camilo Alonso Vegari –*Camulo* esaten zioten Espainia aldean, guardia zibilen buru izandakoa zen–, ez zitzaion askorik gustatu. Ez askorik eta ez gutxirik, batere ez! Sei hilabeteko kondena eta hamar bat mila pezetako isuna jaso nituen Estatutik. Elizaren aldetik, berriz, zaparrada. Dena dela, Elizaren barruan nire fabore berba egin zutenak ere egon ziren, euren artean eraginkorrenetakoa nire lagun Juan Angel Belda Dardiña, gero gotzain izatera helduko zena. Haiek indar handia egin zuten, eta beharbada errazago libratu nintzen.

Inguruko apaizek, berriz, elkartasun handia erakutsi zidaten prozesatu nindutenean. Euren artean aparteko laguntza eman zidan bat Pedro Berrioategortua izan zen, Zornotzako apaiz laguntzailea orduan. Nire lagun honek, egun bere emazte den Txaro Aranbarrirekin eta euren koadrila osoarekin batera, neuk baino ardura handiagoa izan zuen nire arazoagatik, eta une orotan izan nuen ondoan behar zen guztirako.

Esaten dute ni izan nintzela apaizetan errebelatzen lehenengoa, baina ni baino lehenago izan zen Ulazia, azpeitiarra edo azkoitiarra zen ez dakit. Ni baino lehenago epaitu zuten, Donostian (Esnaola, 1994; *Euzko Deia*, 1961).

Estatuaren aldetik etorri zen zigorrari dagokionez, sei hilabeteko kartzela zigorra bete behar nuen. Isuna, berriz, ez nuen ordaintzeko dirurik.

Areatzako eskolakoak 1964an gertatu ziren, eta urte hartan bertan irakurri nuen sermoia, azaroaren batean. Epaitu, berriz, 1965eko maiatzean epaitu ninduten, Madrilen, Tribu-

nal de *Orden Público* izeneko auzitegi berezi famatuan. Nire epaiketara handik eta hemendik apaiz asko joan zen, 300 inguru, sotana handiekin Madrilgo kaleetan zehar hango Justizia Jauregiraino. Ez zieten hara sartzen utzi eta hainbeste izan ziren, non epaiketa suspenditu egin zuten eta hurrengo larunbat arratsaldean –larunbat arratsaldez egindako lehen epaiketa zela zioten abokatuek–, ipini zuten, apaizik joan ez zedin, igandeko mezengatik. Kartzelara eroan, 1968an eroan ninduten. Abokatuak Auzitegi Gorenera iritsi nahi zuen, eta bateko eta besteko helegite eta tramiteak tarteko, 68ra ailegatu ginen. Urte hartan, barrura! Ez da ahazten erraza zelan atxilotu ninduten Gernikan, kultur etxean nengoela. Orduan ere gazte talderen batekin egongo nintzen. Etorri ziren polizia sekretuak eta esan zidaten komentura joan behar nuela eurekin. Nik, kartzelara bazen, baietz, joango nintzela eurekin, baina komentura bazen, arrastaka eroan beharko nindutela. Eta, ni euren aurrean nindukatela, telefonora joan ziren. Ez dakit benetan gotzainarekin berba egin zuten ala ez, baina esaten egon ziren telefonoan beste aldekoari nik kartzelara nahi nuela, ez komentura. Hariaren beste aldetik, berriz, komentura eroateko esan ei zieten... Jakina, Gernikako kultur etxean ginen, dena jendez beteta, baina polizia haiek arrastaka atera ninduten, eta nora ez nekiela eroan ninduten. Horrela heldu ginen Dueñasera (Palentzia), hango monje zistertarren komentura.

Kartzelara ala komentura joatea ez zen debaldeko kontu hutsala. Herriaren alde ari zen jendea barrura eroaten zuten, edozergatik. Orduko gizarte-ekintzaileak, era guztietakoak, barruan zeuzkaten. Gure lekua ere haien ondoan zegoen. «Gure lekua kartzela da, ez komentua!», esango genuen guk geroago.

Dueñasko komentuan egundoko iskanbila sortu zen. Ez ni nintzelako presoa, bisitan zetorren jende mordoagatik baino. Sasoi hartan presoak bisitatzera kartzelara joaterik ez zegoen, baina Dueñasko komentu hartara bai, eta jendea eurrez



etortzen zitzaidan bisitan. Baina badiotsut, ez niregatik, ezpada ez zegoelako beste inora presoa bisitatzera joaterik.

Komentuan, fraideek etxaldean libre ibiltzen uzten zidaten, bertan preso banintzen ere. Ikaragarri zabala zen etxalde hura; Pisuerga eta Carrion ibaiek bat egiten zuten euren lursailean. Milaka fruta arbola zituzten! Bertan, berriz, behe mailako fraideen lagun egin nintzen: atezaina, ostalaria eta besteren batzuk lagunak nituen. Abata, ordea, *Fuerza Nueva* aldizkaria –eskuin muturreko agerkaria– hartzen zuenetakoa zen. Zer gertatu zen? Jendea hainbeste etortzen zenez, eta iskanbila ere handia sortzen zenez, gorroto itzela ere sentitu zutela batzuek eta ni kartzelara eroateko eskatu zutela. Etorri ziren poliziak –ni kartzelara eroateko–, eta nik, gotzainaren baimen sinatua neure begiz ikusten ez banuen ez nintzela kartzelara joango. Gotzaina historiaren aurrean bustitzea lortu nahi nuen. Bitartean, ezkutatu egin nintzen komentuan. Fraide behe mailako haiek –oso nire alde–, poliziari esanez: «Aita Alberto eroan? Eztaaa! Nire larruaren gainetik! Berak gura ez badu, ez duzue eroango». Komentuko fraideek poliziari! Zelako nahastea! Poliziak, orduan, notarioa ekarri zuen gotzainaren baimen sinatua zekarrela –Pablo Gurpide zen gotzaina, *Otsagabiako Txikito*–, eta Zamorara eroan ninduten, Konkordatu Kartzelara. Orduantxe inauguratu zen, nirekin. Handik egun bira edo, bi fraide ekarri zituzten, Felipe Izagirre eta Juan Mari Zulaika, eta hirurok egon ginen. Gero, apaiz eta fraide koadrila etorri zen, isunak pagatu nahi ez eta. Nirekin, antza, *debekualdia* ireki zen.

Zamoran nengoela, done Jakue urtea gertatu zen, eta erdira jaitsi zidaten zigorra. Nik hilabete eta erdi egin nuen Dueñasko komentuan, eta beste hilabete eta erdi Zamoran. Besterik ez nintzen ni egon han.

Lehenengo kondena beteta, Zamoratik irten 1968ko irailaren 8an eta Derioko itxialdia etorri zen berehala, 1968ko azaroaren 4an. Hura bai, oso gauza inportantea izan zen. Hirurogeita hamarren bat abade sartu ginen hango seminarioan.

Orduantxe sortu zen Gogor taldea, Derion bertan. Itxialdia 68ko azaroan izan zen eta «*Operación cuatro, cuatro, mil*» («Lau, lau, mila operazioa») zuen izena; alegia, azaroaren lauan, arratsaldeko lauretan, mila pezeta hartuta gastuetarako. Nire kasuan, dena segidan etorri zen, batetik irten eta bestera sartu, esan gura dut. Guk –hainbat apaiz, Xabier Amuriza, Julen Kaltzada, Josu Naberan eta beste asko–, zer edo zer egin behar zela ikusten genuen. Elizarentzat gure Herrian ez zegoen ezelako problemarik... Frankista zen Eliza hura. Haien iritziz, Euskal Herririk ez zen, euskararik ere ez... Derioko itxialdiak Eliza herriari begira ipini nahi zuen. Eliza pobrea, herriaren aldekoa, justiziaren alde egingo zuena, Eliza profetikoa. Horixe nahi genuen. Dokumentu bat ere idatzi genuen, Erromara eroan zena. Derion entzerratu ginelako, berriz, Elizak *a divinis* suspenditu gintuen, hau da, meza emateko baimenik barik utzi gintuzten. Guk zer egin genuen orduan, zer erabaki genuen? Domeketan herrietara joatea. Meza esan ezin genuenez, bestek esaten zuten mezatara joaten ginen, geure herrietan. Ni, Ajuriara. Bertako jendeak denetarik esaten zuen. Askok, «Guretzako larregi da hemen pasatzen dena!». Akordatzen naiz sermoia egin nuen egunean, herriko gizon batek –hirurogei bat urtetsukoa–, esan zidala: «Zuek ez dozuez ezagutzen honeek! Apurtu egingo zaitue! Txiki-txiki!». Jakina, «honeek», frankistak esan gura zuen. Erreakzioak horiek ziren, beldur ikaragarria zegoen bazterretan! Orduan esan egin behar ziren nire sermoiko gauzen antzekoak!, nahiz eta orain ikusita, ur bedeinkatua izan!

Azaroan itxialdia Derion, eta hurrengo urteko maiatzean, 1969an, beste itxialdi bat Bilboko Gotzaindegian. Amurizak kantatu zuen:

Maiatzeko egun batez
hogeita hamar hain suertez
gose greba bat hasi genduan
geure borondatez
goitik defentsarik batez
guztia zan geure kaltez



obispo ta apaiz kolko handiak
lasai bizi bitez.

Bilboko Gotzaindegian gose-greban sartu ginen, giroa ere halakoa zelako. Orduantxe izan ziren torturarik gogorrenak. [ETAren] Santanderreko erorialdiaren ondorengoak. Mario Onaindia, Jon Etxabe... era basatian torturatu zituzten. Grebak eta langile-borrokak ugari ziren eta, jakina, egurra ere bai. Bestalde, konturatzen ginen Erregimena desegiten ari zela, Eliza ere haien atzaparretatik eskapatzen ari zen. Nik esango nuke, apal, horretan guk geure ekarpentxoa egin genuela...

Gotzaindegiko itxialdiari dagokionez, poliziak etorri arte iraun genuen bertan, lau bat egunez edo. Gose-greban paratu eta hurrengo egunean Jose Maria Cirarda etorri zitzaigun, Bilboko elizbarrutiko gotzain ardura zuena. Sartu eta esan zigun: «Eta zertan ez zarete Carlton hotelera joan gose-greba egiten? Elizaren adar banandua izango zarete!». Guk erantzun genion eurek euren egitekoa ez zutelako betetzen geundela han gose-greban; herritarrak iritzi emateko eskubide barik zeudela, ezertarako eskubiderik gabe, jendea komisarietan jo eta apurtu egiten zuten bitartean Elizak ez zuela ezer ere egiten... horregatik paratu ginela han, Gotzaindegian, gose-greban. Berak –Cirardak, esan gura dut–, egin behar zuena egiten ez zuelako geu ari ginela egiten. Gogorra eduki genuen enfrentamendua! Edonola ere, gure enfrentamendua batez ere diktaduraren kontrakoa zen, eta Elizaren kontrakoa, diktaduraren konplize indartsua zen aldetik. Polizia sartu zen arte egon ginen han.

Guk bagenekien Poliziak, aginte zibilak, ez zuela han sartzeko eskubiderik, gotzainaren baimena behar zuela. Gotzainak, orduan, Poliziari sartzeko baimena eman beharrean, zera esan zuen: «Zuek ezin zintezkete hor sartu, baina arazoa larria baldin bada, larria baino larriagoa, bada, sartu egin beharko zarete». Besteek, poliziek, zer esan zuten, larria baino larriagoa zela, jakina baietz, eta sartu ziren eta atera gintuzten. Bilboko polizia etxera eroan gintuzten, ez ziguten inori

buruz galdetu, ez jo ez beste. Egun bi edo hiru egin han eta Basauriko kartzelara eroan gintuzten. Handik Burgosera. Gerra kontseilua egin ziguten. Hango jeneralak-eta, dominak paparrean, ezpata eta kapela, zer zen hura! Hamar eta hamabi urteko zigorrak jaso eta kartzelara zuzenean. Naberanek eta biok hamabi urte eta egun bateko kondena jaso genuen. Nik, berriro jausi nintzelako *okerrean* eta Naberanek, berriz, Larrabetzun Txabi Etxebarrietaren aldeko mezen inguruko iskanbiletan, isunak jasota zegoelako. Nikola Telleriari, Xabier Amurizari eta Julen Kaltzadari, hamarna urte bota zizkieten. Jendea harrituta geratu zen. «Zelan liteke zigor hori gose-greba egiteagatik!». Baina horixe zen garaiko giroa, gogorra. Zentzabidea eman nahi zuten, gure buruan abade mugimendu osoa zigortu, urak gora baitzetozen Diktaduraren kontra, eta apaizak jaten ematen zigun eskuari horzka ari ginen. Gu bostok kartzelara eroan aurretik eta ostean, aldrak etorri ziren, abade gehiago kartzelara, isunak paratu eta pagatu barik. Zamoratik berrogeita hamahiru apaiz eta erlijioso pasatu ginen. Baina apaiz ez zen jende askoz gehiago zegoen barruan, era guztietako ekintzaileak. Gainera, abade ere baginen gu, erantzuteko ere nor ginen, edadea ere polita genuen –ez ginen ume, hogeita hamabi bat urte, nik; zentzua ere bagenuen, eta osasun ona–, zetorkigunari kontra egiteko adorea geneukan.

Kartzelan, hainbat gose-greba egin genituen, gehienak Euskal Herriko egoera konkretuekin loturik, baita mutina ere. Horrek zigor-gelak zekartzan, erregimen gogorra. Mutinaren ondoren lau hilabete pasatu behar izan genituen zigor-gelan. Zigor guztiak batuz gero, urte oso bat inguru egingo genuen bakarturik eta zeharo inkomunikaturik. Asko ziren gose-greba eta beste egiteko arrazoiak. Guk, esaterako, preso politikoekin egon nahi genuen kartzelan, ez Konkordatu Kartzelan. Elizarekiko harreman hori apurtu nahi genuen. Akordatzen naiz Jose Maria Setien bera ere etorri zela gurekin berba egiten. Eurek ez zuten nahi gu bestelako kartzelara joatea: ez zuten horretarako biderik ikusten, ez ziren ausartzen edo ez zuten nahi.



Orduan, mutina egitea pentsatu genuen. Jon Etxabe, Paco Garcia Salve eta Gotzaindegiko gose-grebako bostok. Tira, bostok ere ez, Nikola Telleria gu baino hogei bat urte zaharrago zen, gaixorik zegoen, eta gose-greba egin ez zezan konbentzitu behar izan genuen, asko kostata. Amurizak kantatu zuen:

Horra amaitu baino lehen
bost gizonok nortzuk ziren
bat da Gabika hurren Kaltzada
Naberan ondoren
Amuriza da laugarren
nor falta ete da hemen
guztion buru Nikola jarri
behar nuen goren.

Sopelako parrokoa zen Nikola. Gu baino hogei bat urte zaharragoa. Zamoran makal zegoen hura. Ospitalera eroan zuten, Madrilera, halako batean, eta ez genuen gehiago ikusi. Sei urte baino gehiago egin zituen barruan.

Mutinean sakrilegioa egin omen genuen, gurutzeari su eman omen genion eta. Gurutzea salbatuta, ahal izan genuen guztia apurtu eta erre genuen. Dena genuen ongi prestaturik, bakoitzak bere lana bete behar zuen. Heldu zen ordua eta hasi ginen mutinean jo eta su. Funtzionarioak etorri eta «zoratu egin zarete!» esaten ziguten. Guk, «hor bazterrean geratzen bazarete, ez gara zuen kontra hasiko. Beraz, egon hortxe, albo baten!». Bata, jantokiko kristala txikitzen; bestea, telebista apurtzen... Nik aulki batekin ateak apurtzeko lana nuen. Gutako batek han jardun zuen, garai bateko berogailu batekin telebistari joka, apurtu ezinda. «Hartu eta botaegik leihotik behera!», esan nion, eta halaxe apurtu zuen... Beste batek koltxoiari su emateko lana zeukan, edo komunak apurtzekoa... Bitartean, Italiako telebista kamera, kanpotik, gure suen eta koltxoi erreen keak grabatzen eta kartzelako irudiak hartzen, gau hartan bertan handik emateko.

Tunela ere egin genuen, hamazazpi metro inguruko tunela, bestek kontatzen duen moduan.

Kanpoan, preso pribilegiatuak ginela, luxuzko hotelean geundela idatzi eta zabaldu zuten batzuek, eskuindarrek. Beste batzuek, bereziki gogor tratatu gintuztela apaiz ginelako. Denetarik egongo zen, pentsatzen dut nik; aspektu batzuetan gainerako presoak baino gogorrago hartuko gintuztela, eta beste batzuetan, berriz, gozoago. Guri min ematen ziguna Herriarengandik banatzea zen. Hori itzela zen. Familia sartzen ahal zen gu ikusten, baina lehen graduko familia baino ez; lehengusuak, esaterako, ezin ziren bisitan etorri. Eta lagunak, ezta pentsatu ere. Gu behin ere ez ginen bakarrik egon, pentsatu ere ez hori. Barruan, lagun itzelak genituen, denok denontzat ginen. Gu bostok zer esanik ez, baina gainerakoak ere bai. Eta Herria gure ondoan egon zen beti. Babesa sentitzen genuen, duda barik, bai Herriarena eta bai lagunena. Hala ere, kartzela gogorra da, gero!

Irten nintzenean, ilusio ikaragarria nuen itsasoa ikusteko. Zazpi urte Zamoran egin ondoren, itzela gogoa! Zamoratik irten eta biharamunean bidaia bat egin beharra nuen. Tartean, Lagako hondartzatik igaro behar ginen. Bada, han, autotik jaitsi, itsasoari begira paratu eta... ezin neureganatu handitasun hura! Atzera egin behar izan nuen! Ezin segitu hain espazio zabala ikusten, kartzelako ametsetan hainbeste bider ikusitakoa! Ametsetan ikusitakoa benetan ikusteko sasoia ailegatu zenean, ezin neureganatu! Ezin dut esplikatu zer pasatu zitzaidan!

Beste baten, berriz, arbolak laztantzen topatu nuen neure burua... Horrek esan gura du zertzuk pasatu genituen kartzelan: gorriak! Baina kartzela neguko dutxa hotza bezalakoa dela esango nuke, bertan jota gelditzen ez bazara, adore itzela ematen dizu bizitzan edozeri aurre egiteko. Handik irtendako askok erakutsi dute hori.

Zamoratik irten eta utzi egin nuen apaizgoa. Erabat urrundu nintzen Elizatik, baina Herriarekiko konpromisoa betetzen jarraitu dut; beharbada, lehen baino hobeto, gainera. Irten eta lasterrera, maiteen dudan Begoña Solaegirekin ezkondu nintzen. Lan bila hasi eta hilabete batzuetan oporretan egon ondoren, AEKn sartzeko aukera izan nuen. Oso lan emankorra izan zen. Lekeition eta Gernikan hasi nintzen lanean, talde lanean beti, eta bertan hasi genituen barnetegiak ere: Kortezubin, Busturian... Itzultzaile ere jardun dut lanean, Kalegana enpresan, Zamorako lagunekin-eta. Herri-mugimenduetan ere banabil, neure neurrian, eztabaida, abertzaleak elkartzea eta gatazkaren konponbidea, justizian eta eskubideetan oinarrituriko konponbidea, bultzatzen duten taldeekin batera.

Errepresio itzela zen orduan, eta gaur ere ez da makala. Torturak, esate baterako, hor daude. Ez dakit noiz dagoen indartsuago tortura, orduan ala gaur. Duda egiten dut nik. Egia da herria desegiteko amorru hori handiagoa zela orduan. Ezin zitekeen Herri izaera bera ere planteatu. Gaur egun, planteatu bai, plantea liteke, zelanbait, neurri bateraino. Baina egungo torturak, makroepaiketak eta zigorrak izugarriak dira.

Ez naiz harrezkero Zamorara itzuli, baina itzuliko nintzateke, ez dit itsasoak eragin zidan atzerakada hura eragingo. Neguko dutxa hotz hark adoretu eta lasaitu egin nau.



Apaizak Madrilgo TOP aurrean Alberto Gabikagojeaskoaren epaiketa dela eta (1954).

## NOLAKO ERAIKINA, HALAKO BIZI BALDINTZAK

Martin Orbe

### 1. Eraikina

Urrunetik dira ezagunak presondegi izateko egindako eraikinak, kartzelak. Zamorakoa hiritik Almarazera doan errepidearen 2. kilometroan dago; ez du hiritik bertara heltzeko komunikabiderik, partikularrak izan ezik.

Diktadura frankistak Arlotekeriaren Legea (*Ley de Vagos y Maleantes*) promulgatu zuenean, Zamorako kartzela aukeratu zuen lege horren arabera zigortutako alderrai eta gaizkileek ezarritako zigorrak bete zitzaten.

Konkordatu Kartzela alfer eta gaizkileentzat aukeratutako presondegiaren hegal bat baino ez zen; Zamora probintziako preso prebentiboak kartzelatzeko kartzela probintziala, hain zuzen; elizgizonak kartzelatzeko Konkordatu Kartzela bilakatu zenean ere, kartzelako funtzionarioek horrela deitzen zioten, «*la provincial*».

Eraikin errektangeluarra; hiru solairu zituen. Behekoan, dutxak, oinak garbitzeko aska korritua, komun bat, kanpotik jasotako jakiak gordetzeko erabiltzen zuten gelatxo bat eta beti giltzapean zegoen arropa-garbitegia zeuden; behealde horren maila berean, patioa; erdikoan, jantokia, komuna eta gela bi, bata udarako eta bestea, berogailuak zituena, negurako (ge-

roago, 1975. urtean, gela hauetariko batean lau gela egin zituzten, egunez giltzaz hertsiak eta lo egiteko baino erabiltzen ez zirenak); erdiko solairuaren alboko ia luzera guztian patiora ematen zuen galeria irekia zegoen; goiko solairuan, azkenik, lotegia, komunak eta atean *enfermería* errotulua zeukan arren hutsik zegoen gela, inkomunikazio-zigorrak betearazteko erabiltzen zutena.

Bai dutxak eta bai komunak irekiak ziren eta erdiko solairukoak baino ez zuen komun-katilua. Dutxa larunbat goizetan baino ezin hartu izaten zuten, gerra ostean herri txikietako eskola nazionaletan egon ohi ziren estufa haien moduko baten bidez ura berotuta. Bizarra kentzeko tresnak funtzionarioek gordetzen zituzten eta astean bi aldiz eskatu ahal –eta behar!– izaten ziren. Hilabeterik behin edo etortzen zen ile-mozlea, amen baten denei ilea mozteko.

Patioari dagokionez, 20 metro zen luzera eta 10 zabalera; alde batetik, kartzela probintzialaren eraikinaren horma zuen, eta beste hiruretatik, bost metro inguruko altuerako hormak, bi presondegiko itxitura-hormak eta bestea presondegi guztiaren inguruko esparruaren itxitura-horma; ez arbolarik, ez belarrik, ez landare izpirik; zorua harri-kirri trinkotuzkoa. Ez zuen, beraz, ezelango kirolik egiteko baldintzarik. *Beso-pilota* izenaz bataiatu zuten pilota jokoaren modalitatea asmatu behar izan zuten; airezko pilota handi samarra, besoaz, hormaren kontra jaurti eta handik irtetean airera nahiz botera hartu eta berriz hormaren kontra. Zerbait egin behar eta, bai buruz buru eta bai binaka jarduten zuten.

Han egiten zituen Kiko Botey katalanak, eskuzapi batean eserita, yoga ariketak. Kontzentrazio handia eta ariketa asko behar zirela esaten zuen, gorputz malgutasuna erdietsiz gero yoga ariketak egin ahal izateko. Kontua da Paskual Intxausti pasiotarrak, bere betaurreko lodiekin begira-begira egon eta funtsezko azalpen bat edo beste entzun eta beste barik, Kikoren harridurarako, hark adina bihurrikatze egiten zituela, yogaren zailtasunaren ustea kolokan jartzeraino.



Kartzelako beheko solairuan dutxak eta oinak garbitzeko aska zegoen gelaren eta patioaren artean, karraju bat zegoen bi aldeetan hormak zituena; patiora ematen zuen horma ez zen horma itsua, leiho gisako irekidurak zituen. Hantxe jokatzen zituen Nikola Telleriak partida gogorrak, Josu Naberanen kontra, gehienbat. Trinketea zen kartzelako argotean.

Patioko hormetako bati itsatsita, kartzela nagusiko sukaldeko tximinia zegoen, goizetik gauera kea eta kedarra zeriola, bai patioa eta bai kartzela probintziala bera, beheko eta erdiko solairuak batez ere, kedarrez belztuta uzten zituena. Kedarraren mantxak baino okerragoak ziren bere osagaiak, hots, anhidrido karbonikoa ($CO_2$), karbono monoxidoa ($CO$) eta anhidrido sulfurosoa ($SO_2$) eta kedarra ($C$). Zein patioan zein eguna igarotzeko geletan, eta neurri txikiagoan izan arren logelan ere bai, keok irenstea beste erremediorik ez zegoen.

Klimatologia ere ez zen egokiena kartzelako baldintzak arintzeko; azarotik apirilaren azkenetaraino ez da eguzkirik ikusten Zamoran. Hotza handia izan ohi da hango neguetan, bai egunez eta bai gauez jasan beharrekoa; izan ere, Zamorako gauetan, maiz, zero azpitik -10º graduraino jaisten zen tenperatura eta, kontuan izanik patiotik logelarako tartean ez zegoela eskailera eta burdin barra lodizko atea baino, ez zen harritzekoa zero azpitik -5º gradutako tenperatura izatea logelan, neguko gau askotan.

Hotzaren deserosotasuna gutxi balitz bezala, bazen petate ganorabako eta labur haietan eta pisua besterik ez zuten manta latz eta zurrun haien azpian lo egiteko beste arazo bat; izan ere, bizpahiru bonbilla pizturik uzten zituzten gau osoan. Enrique –Enriquito apaiz presoentzat– izeneko zerbitzu-buruaren erabakia izan zen, denak apaizak izan arren, nolako sexu-joerak izan zitzaketen jakiterik ez zegoela argudiatuz.

Eta zer esan elikaduraz? Garai haietan 21 pezetatakoa zen preso bakoitzaren eguneroko jatorduetarako aurrekontua. Erregaien kostua eta bitartekarien irabaziak kenduta, 13-14 pezeta gelditzen ziren janarietarako. Hura, eskasa izateaz

gain, gaizki prestatua, zikina eta hotz zerbitzatua izaten zen. Eta nolakoa sukaldaritza, halako tresneria, zer kolore zeukaten igarri ezinezko lapiko eta ontzietan ate birakari batetik ateratzen zuten janaria, mailatunez beteriko aluminiozko plateretan, koilara hutsez jan behar izaten zena. Aiztoak eta sardexkak –tresna arriskutsuak, omen– galarazita zeuden. Zamorako Konkordatu Kartzela eta hango erregimena azaltzeko Xabier Amurizak egin zituen bertsoetan, argi asko jasotzen du kontu hau: «hemengo potajeak probatu ezkero / bizkarrak gizentzerik ez dugu espero».

Osasun arretari dagokionez, ondoezik izanez gero txandako funtzionarioari, goizeko bederatziak orduko, medikuarengana joateko izena ematea beste aterabiderik ez zegoen. Halabeharrez, kide bi baino ez ziren izan medikuaren laguntzaren beharrean, eta biei eskainitako atentzioa kartzelako beste zerbitzuen parekoa izan zen.

Patxi Bilbaok maiz izaten zituen lunbago-ajeak. Medikuarekin egon eta itzuli zenetariko batean, eskuan zekarren pilula mahai gainera jaurti, eta jenio txarrez, *actio in distans non repugnat*, izatez baiezkoa den latinezko esaldia ezezko forman oihukatu zuen. Zer dugu, bada, gaurkoa, Patxi, galdetzean, zera erantzun zuen: «Berarengana iritsi naizenerako, eskuan zeukan pilula eman eta bidali nau, beste ezer galdetu eta esan gabe». Ezin asko gehiagorik itxaron bere itxurari erreparatuta, Xabier Amurizak *katamierlea* gaitzizena jarri zion medikuarengandik.

Larriagoa izan zen Nikola Telleriaren kasua. Guztietatik adinduena zen eta maiz izaten zituen urdaileko minak, bihotzerreak eta beste gaitz batzuk. Lau bat urte Zamorako espetxean egin eta gero, Carabanchelgo kartzelako erizaindegira eraman zuten. Orduko berandu zen. Minbiziak jota zegoen eta kartzelatik atera eta hilabete gutxira hil zen, lau urte luze barruan egin eta gero.

Konkordatu Kartzelan ez zegoen *bizitza pribaturako* ezelako posibilitaterik. Ez zeukan gela indibidualik, ez bakarrik



egoteko ezelango gunerik. Eguna igarotzeko gela bakar bat zegoen guztientzat eta guztirako, nahiz irakurri eta ikasteko, nahiz egoneko jokoetarako; sala korrituan zeuden logelako oheak; aterik gabe komunak eta dutxak...

Eraikinaren hoztasun eta gabezien ondoan, kartzelako araudia jarri behar. Ehun eta berrogei bat artikulu-edo zituen *Cartilla del recluso* ematen zioten presoari, baina zigorren baten berri ematean, berrehun edo hirurehun eta ez dakit zenbatgarren artikuluaren araberako zigorra zela jartzen zuen paperak. Urtez urte erantsitako arauak omen ziren, inongo liburutan bildu gabeak horratio.

Eremu mugatu hartan itogarria gertatzen zen kartzeleroaren presentzia. Konkordatu Kartzela hasi berritan, bat bakarrik egon ohi zen kartzela probintzialeko zaintza lanetan; Burgosko prozesuaren ondoren bi eta, azkenean, hiru. Kartzela honen azken urteetan sei apaiz baino ez zeudela kontuan izanik, maiz gertatzen zen zaintza lanetan ari zirenak eta zerbaitetara etorritako joan-etorriko kartzeleroak kontuan hartuta, preso baino kartzelero gehiago izatea.

Egiaren faboretan esan behar da bazirela, kartzeleroen artean, hiruzpalau gizon onak zirenak, gizaseme normalak esango genukeenak, lanbide egokiagoren baten faltan kartzelako funtzionario lanaren aldeko hautua egindakoak, baina presoenganako areriotasunik erakusten ez zutenak. Gehienak, aldiz, batez ere oposaketa bidez funtzionaritza lortutakoak –uniformeko botoi doratuetatik bereizten ziren– eta zerbitzuburu ala hortik goragoko karguren bat zutenak, kartzelako erregimen suntsitzailearen kolaboratzaile konbentzituak zirenez, presoa erregimen horren areriotzat hartu eta horrelaxe tratatzea zuten erronkatzat.

Eguneko zeinahi ordutan eta ustekabean egiten zituzten katxeoetan nabarmentzen zen haien herra. Jantzien gainetik, gorputza goitik beheraino ukituz egindakoak usuenak; preso bakoitzaren gauzak –lotegiko armairutxoetan gordetako arropak, oheko *petatea*, eguna igarotzeko gelako armairuko

liburuak, eta abar...– isilean,arakatuz eta miatuz egindakoak ustekabekoenak; eta biluzaraziz egiten saiatzen zirenak –apaizek onartzen ez zituztenak, noski– lotsagarriak, umiliagarriak eta iraingarriak.

Beren jokabide zital hori lotsarik gabe azaltzen zuten. Konkordatu Kartzelaren azken urteetan zuzendari izan zenak hitzez hitz esan zizkienak ez ziren makalak izan. «Beharrezko izanez gero, prest nago bola batera lotzeko; zuen arazoak bost axola; ardura zaidan kontu bakarra, zera da, ez dezazuela ihes egin» (*«Estoy dispuesto a atarles una bola si es preciso»; «sus problemas me tienen sin cuidado»; lo único que me importa es que no se escapen»*). Horretarako beste hainbeste kartzelero jarri behar izanez gero, bat ere ez arazorik: «Gogoak ematen didana egingo da» (*«Se hará lo que me venga en gana»*). Horrela iritsi zen zortzi presoentzako hiru kartzelero jartzera.

Presoarentzat kanpoaldearekin eta kanpokoekin duen harremana da arnasbiderik nagusietakoa. Bisitak eta gutunak ziren kanpokoekin harremanetan jartzeko bide bakarrak. Telefonoz berba egiterik eta, planteatu ere ez.

Bisitak, hilean behin, eta lehen graduko senitartekoenak bakarrik; ordu erdikoak. Alderik alde eta behetik gorainoko burdinsarezko bi hesi zeuden bisita gelan; metro erdi inguruko tartea bi hesien artean; hesi baten atzean presoa eta bestearen atzean bisitaria; presoaren aldamenean, kartzeleroa. Funtzionario normal bat tokatuz gero, presoaren atzealdean paseatzen ibiltzen zen, baina bestetarikoa izanez gero, presoaren ondoan mugitu gabe eta inoiz hesi bien arteko tartean aulki batean eserita eta hitz egiten zenari buruzko notak hartzen. Euskaraz hitz bat eginez gero, bisita eteteko mehatxua; berdin kartzelako gorabeheraren bat aipatuz gero. *Vis-à-vis*eko bisitarik eta, existitu ere ez...

Gutunei dagokienez, berdintsu; lehen graduko senitartekoei bidali eta haienak jaso. Astean bi idatzi ahal ziren, bat abizenaren lehen letrari zegokion egunean eta bigarrena, *Redención* aldizkariaren harpidedun izanez gero, asteko edozein



egunetan. Irekita entregatu eta irekita jaso, noski. Erdaraz eta kartzelako gorabeherarik aipatu gabe. *Ahora la noticia bomba, Benantzio Laskibar se casa... A la madre le ha extrañado que no comentes nada de las gallinas rojas...* eta gisako esaldiak zentsuratzen zituztenean, pentsa nolako irizpideak erabiltzen zituzten...

Liburuak ere ez ziren zentsuratik libratzen, nahiz Valladolideko Unibertsitateak egindako filosofiako apunteak izan, nahiz Miguel Hernandez, Pablo Neruda edo Leon Feliperen poesia liburuak izan, nahiz *El Dios en el que no creo, Quince curas en el banquillo* edo *La misa secularizada* gai erlijiosoetako liburuak izan. Inkisizioa bezain zorrotz.

Maisuki jaso zituen Xabier Amurizak kartzelako baldintzen eta bertako erregimen gogorraren frogak *Bertso berri batzuek behar ditut jarri* izeneko sortan: «Etxetzar bat hemen da... / gizonak piztitzeko / apropos egina».

## 2. Lanez eta menderakaiztasunez kohesionatutako taldea

Kausa justu baten alde borrokatzeagatik espetxeratua izan denak ondotxo daki kanpoan oldartu zaion sistemari eusteko asmakizun batekin topo egingo duela kartzelan, eta asmakizun horrek errebelde izan dena zigortzea duela helburu nagusi. Jendartea gaizkileagandik babesteko omen den kartzela, sistemaren interes eta balioak bermatzeko dela ulertuko dute presondegi-diseinatzaileek, eta presoa birgizarteratzea, etsai politikotzat hartutakoa ezereztea izango da haientzat.

Gauzak horrela, bai preso politikoak eta bai kontzientziazko presoak ezin die men egin kartzelako araudiari, bidegabekeriei, zigorrei... Eta hori, kartzelako egonaldia, horrela jokatuz, gogorragoa gertatuko zaiola jakinik.

Kartzelaren erasoari erantzun irmo hau eman beharra preso politiko bakoitzaren barne-muinean ongi finkatuta egon arren, kartzela bakoitzeko baldintzen arabera zehazten

da, ezinbestean. Zer esanik ere ez, kartzela berean talde bat dagoenean.

Horixe izan zen Zamorako Konkordatu Kartzelaren kasua. Bertan espetxeratutako apaiz euskaldunak, elkar ezagutzeaz gain, ideal berberen alde borrokatzeagatik espetxeratu zituzten. Penintsulako beste lurraldeetako presoekin, bestalde, kidetasun handia zuten bai gizarte arazoei buruz eta bai Elizaren jokabideari buruz.

Horrela, bada, hiru izan ziren, batez ere, Zamorako kartzelako apaiz taldeak kartzelaldiari eusteko eta erantzuteko hobetsitako baliabideak.

Lehenik, taldea balioztatzea aipatu beharko litzateke. Horren adibide argia diruaren kutxa komuna izango litzateke. Bakoitzaren diruaren kontura ateratako *baleak* astero txandatzen zen administratzailearen esku uzten ziren, eta diru-kopuru –bale-kopurua, kartzelan– horretatik ordaintzen zituen kide bakoitzaren gastuak. Norbaiten diruak amaituz gero, txandakako administratzaileak jakinarazten zion. Horrela, urteetan, gorabehera eta haserrerik gabe.

Kanpotik jasotako janari paketeak ere horrelaxe administratzen ziren. Egiaren faboretan esan behar da bizkaitar gehienen paketeak bateratuta bidaltzen zituztela eta, horrenbestez, ongi bideratuta zetorren nolakoa behar zuen izan hartzaileen jokabideak. Eskertzekoa eta gehiago Pedro Berrioategortuak, Zornotzako Eroski hipermerkatuko langile Txarok eta Zornotzako beste lagunek urteetan egindako ahalegina eta emandako laguntza.

Kideren batek arazo nahiz zigorren bat izanez gero, taldean eztabaidatzen zen zer erantzun emango zioten; berdin kartzelako gorabeheraren batengatik nahiz kanpoko arazo zein egoeraren batengatik jarreraren bat hartu ala ekintzaren bat egitea planteatzen zenean.

Talde-jokabidearen aberasgarritasuna ez da gai serioetan bakarrik nabaritzen; ezinbestekoak dira lasaitze-guneak ere. Horrelako bat asmatzen eta eratzen ahalegindu zen, eta lortu



ere egin zuen, Txema Auzmendi jesuita. Kiko Botey fraide eskolapio katalanari eskatu zion Ducados tabako-paketeen kartoiak erabiliz karta jokorako irudiak margotzeko. Eta dotore asko margotu ere Kikok. Patiotik jaso zituen harri-koskorrak tantoak kontatzeko. Gero, adeitsuki, berak ohi zuenez, bikoteak moldatu zituen. Hamarretan zen logelara igotzeko ordua, baina hamaikak arte ez zituzten argiak itzaltzen. Tarte horretan jokatzen ziren mus partidak. Partiden emaitzak eguna igarotzeko gelan jartzen zituen, *literatur lehiaketaren* titulua jarrita.

Dena zihoan ongi. Egun batez, isilean egindako katxeo batean, logelako garbi-ikuziaren arduradun zen Alberto Gabikagojeaskoaren arropak gordetzeko armairutxoan kartak eta harri-koskorrak aurkitu zituzten arte. Jakina, faltaren berri eman zuten. Kartzelako *Junta de Régimen* –zuzendariak, zuzendariordeak, zerbitzuburuek, kapilauak eta maisuak, besteak beste, osatua– delakotik deitu zioten Albertori faltaren astuntasuna eta zegokion zigorra jakinarazteko. Entzutekoa izan omen zen –Albertok berak kontatzen zuen– mahai baten gainean karta ziztrin eta harri-koskorrak eta inguruan jaun gorbatadun ospetsu haiek ikustean bota zien purrustada, haien ganorabakokeria eta zentzugabekeria aurpegiratzeko; baina alferrik, noski. Albertori zigorra eta akabo Txemak hain maitekiro eratutako museko karta-joko lehiaketak.

Aipatzekoa eta eskertzekoa Mikel Zuazabeitiak lagunartea gozatzeko zuen trebetasuna. Erritu bilakatu zen, Txomin Artetxek moldatutako bertsoarekin, kide bat kartzelan sartzean *Etorri al haiz, etorri al haiz...* kantatuz egin ohi zuen harrera. Gogoangarriak, bestalde, Aretxabaletan, Eskoriatzan, Legorretan... bizi izandako pasadizoen kontakizunak, Eskoriatzako musika-bandak estreinako emanaldia kamioi batean eman zuenekoa, futbol taldearen lehen partidarako arbitroa aurkitzeko komeriak... Arantzazuko fraideen sermoien imitazioak... Getariako Inakitoren gorabeherak...

Taldekideen urtebetetze egunak ziren ospatzeko aukeratuak. Ohetik jaiki eta garbitze kontuak egin eta gero, Xabier Amuriza eta Martin Orbek diana txistukatzen zuten logelan zehar; ondoren, logelan bertan, aurreskua dantzatu urteak betetzen zituenaren omenez. Kepa Arrate jesuita zen horretan maisua eta Julen Kalzada ikasle abantailatua. Lukax Dorronsoro Gipuzkoako aurreskua irakasten saiatu zen. Kepa Arrate eta Julen Kalzada ederki moldatzen ziren horretan ere.

Gosaldu ondoren, beso-pilota partida bereziak, eguraldiak lagunduz gero, partxis jokaldi erraldoiak, jokalari bakoitzak zortzi fitxarekin, ping-pong partidak horretarako jaioak zirenek, eta horrelakoak.

Euskaldunen ohitura onei muzin ezin egin eta horrelako egunetan bazkaltzeko jangarri zitekeen zerbait prestatzen saiatzen ziren. *Demandarerari* auma ala oilasko errea agintzen zioten, eta postrerako fruitu mazedonia prestatzen zuten, ontziko fruituekin, noski; bukatzeko, basoerditxo Nescafe.

Kartzelak ospakizunetarako baliabiderik eskaini ez eta presoen ahalbideak urriak izanik, goizean ospakizunerako erakutsitako gogoaren indarrak eguerdi alderaino irauten zuen. Zorte pixka batekin urteak betetzen zituenak gutunen bat edo jasoz gero, huraxe komentatzea izaten zen jaiaren azken euskarritxoa. Hortik aurrera, arratsalde partean, kartzelako egunerokotasunaren monotoniara itzuli behar, ezinbestean.

Taldearen kohesioa funtsezkoa izan zen kartzelaldian, baina ez zen dena arrosa kolorekoa izan. Lau kidek, kartzelaren pisua jasanezinik edo, kartzela-zigorra monasterioren batean betetzearen aldeko aukera egin zuten. Konkordatuaren arabera, horretarako eskubide osoa zuten. Gehienek, aldiz, ez zituzten onartzen Eliza Katolikoaren eta Estatuaren arteko erlazio sasikoak eta, beraz, ez Konkordatu Kartzela, ez eta monasterioa ere; preso politikoek zeuden kartzeletan zigorrak betetzea eskatzen zuten.



Egoera honetatik sortutako hoztasuna gaiztotu egin zen Jose Maria Cirarda gotzainak, monasterio batera joatearen aldeko gestioak zaildu zitzaizkionean, zera argudiatu zuenean: kartzelan jarraitu nahi zutenek jarrera anthierarkikoa zutela eta apaiz-balioen aurretik ideal politikoak jarri zituztela eta, beraz, jarrera hori apaiz zintzo izaten jarraitu nahi zutenentzat kaltegarri izan zitekeela. Antonio Maria Oriol Justizia ministroak eta Burgosko Kapitain jeneral Garcia Rebullek «Anasegandik Kaifasengana» zerabiltela ikusi eta gero, Jose Maria Cirardak Francori berari egin zion eskaera eta lortu ere bai lau apaizok monasterio batean zigorra betetzea. Villagarcia de Camposeko monasteriora joan zirenean amaitu zen egoera gaiztotua. Lauretatik hiru monasteriotik irten eta berehala sekulartu egin ziren.

Larriagoa izan zen delitu arruntengatik preso zegoen Hipolito Perez apaiz extremadurarrak sorrarazitako egoera. Konkordatu Kartzelaren lehen urte bietan, bat baino ez zen delitu arruntengatik preso zegoen apaiza. Kanpotiko laguntza modurik ez zuen eta, ahalegindu ziren bai beste kideak hari laguntzen.

Gerora, hiru izatera iritsi ziren eta, pixkanaka-pixkanaka, talde berezi modura funtzionatzen hasi. Euretariko bat, extremadurarra esan dugunez, gertatu zen bereziki polemikoa. Logelan izan ezik, espazio eta erregimen berean bizi behar zutenez, eguneroko zenbait alor eta arazotan, bereizketarik gabe, taldekide gisa hartu eta laguntzen zieten eta kartzelako bidegabekeria eta zigorrei erantzuteko orduan ere jarrera ala ekintza bateratuak planteatzen zizkieten. Planto horietako batean parte hartzeari uko egin zioten; zerbait estutu zituztenean, kartzelatik ihes egiteko asmoz egiten ari ziren tunelaren berri kartzelako arduradunei emateko mehatxua egin zien Hipolitok. Hortik aurrera talde bi moduan funtzionatu behar, badaezpada.

Eguneroko jarduna izan zen bigarren baliabide nagusia. Euskal Herriaren arazoei erantzuteko hobetsitako jarreren-

gatik eta horren ondorioz egindako ekintzengatik kartzelatu zituztenez gero, herriari, zegokien arlotik, noski, ahal zuten zerbitzurik hoberena emateko euren buruak prestatzeko konpromisoa hartu zuten. Erraz uler daitekeenez, ikasketak ziren ahalbide bakarra; buru-lana, beraz.

Euskararen ezagutze maila hobetzea jo zuten lehenengo eginbehartzat. Gosaldu eta gero kartzelako bazterrak, gogo handirik gabe, egia esateko, txukundu ondoren, ekintza honetara deitzeko *sintoniatzat* aukeratutako *Astotxoa, gure astotxoa...* kantuaren soinura biltzen ziren. Xabier Amuriza zuten maisu, eta ez nolanahikoa, alafede! Euskal Aditza, Deklinabidea eta Euskal Literatura izan ziren landutako alorrak.

Itzulpengintza ere zerbait landu zuten. *Guillermo Tell tiene los ojos tristes* (Sastre, 1984) antzerkiaren kapitulu bana itzuli eta Xabierrek zuzentzen zizkien bakoitzaren akatsak, eta itzulpena hobetzeko euskararen baliabide, esamolde, berezitasun eta abar jakinarazi.

Azkueren hiztegian lehen orrialdetik azkeneraino atzizki bera duten hitzen zerrendak ere prestatu zituzten, atzizkiz atzizki. Xabierrek jaso zuen *corpus* hori eta atzizki bakoitzak izan ditzakeen adieren azterketa egin zuen. Atzizkien sailkapen bikaina eta lan-tresna egokia. Euskarak mailegu modura hartu beharko lituzkeen aurrizkien azterketa ere egin zuen Xabierrek berak. Azterketa biok Euskaltzaindiaren *Euskera* buletinak argitaratu zituen.

Bertsogintzaren teknikak irakasten ere saiatu zen Xabier Amuriza. Horretan egin zituen ahaleginak seguru aberasgarriak gertatu zitzaizkiola berezkoak dituen bertsogintzarako dohainak hobetzeko, kartzelatik irten eta gero Euskal Herriko Bertsolarien bi Txapelketa irabazi baitzituen. Alabaina, ez zuten balio izan kartzelako kideen artean Txirrita berririk aurkitzeko.

Taldekako jardunaz gain, aipatzekoak dira bakoitzak egindako ikasketa eta lanak ere. Xabier Amurizak liburu bi idatzi, *Menditik mundura* eleberria eta *Hiztegi errimatua* eta



beste bi itzuli zituen, Aldous Huxleyren *Brave New World, Bai mundu berria* tituluarekin, eta Maite Rungisen *Initiation aux Problemes Economiques, Ekonomiako lehen pausoak* tituluarekin. Julen Kalzadak maisutza ikasketak egin zituen eta, ikasketen azken lan modura, historiaurreari buruzko *Herriak eta gizonak* liburua idatzi. Ez zioten maisu titulurik eman, *Falange Española*-ren agindupean *Servicio Social* izenez ezagutzen ziren ikastaroak ez zituelako egin. Alberto Gabikagojeaskoak, Felipe Izagirrek, Julen Kalzadak, Josu Naberanek eta Martin Orbek *Filosofía y Letras*eko lehen kurtsoa gainditu zuten Valladolideko Unibertsitatean. Ezin izan zituzten ikasketak jarraitu, unibertsitatean diren eta ez diren oztopoak jarri baitzizkieten bigarren kurtsorako matrikulatzeko. Alberto Gabikagojeaskoak gogoz ekin zion ingelesa ikasteari ere. Patxi Bilbaok kontabilitate ikasketak egin zituen, postazko ikastaroen bidez, eta Vicente Couce galiziarrak elektrizitate ikastaroak bide bera erabiliz.

Aipatu beharrekoak Pedro Solabarriak eta Mariano Gamok euskara ikasteko egindako ahaleginak.

Esan behar da, zaila dirudien arren, eskulanetan ere –eta inoiz ere ez hitz hau egokiago erabilita– aritu zirela Konkordatu Kartzelako apaizak, handik ihes egiteko hamazazpi metroko tunela hasi eta bukatu egin baitzuten.

Pertsonak suntsitzeko erakundea den kartzelari aurre egiteko hirugarren bide bat ere aipatu beharko genuke; etengabeko intsumisio-jarrera, hain justu. Preso politikoak beste ezer baino argiago dauka kartzelan ez dagoela gaizkile izateagatik, unean uneko agintari politiko eta sozialek bere jokabideagatik etsaitzat hartu dutelako baino; ezin die, beraz, men egin etsai dituen kartzelako arau, inposaketa eta inguruneari.

Zamorako kartzelaren kasuan, bere izaeragatik izan zitzakeen berezitasunei uko egin zieten beste ezer baino lehen. Horrela, ez zuten kapilauarekin traturik, abadekide izanik ere, kartzelako funtzionario bat gehiago zelako. Bestalde, gela txiki bat utzi zieten meza emateko. Toki horixe eta bertan ema-

ten zuten meza ziren, hain zuzen, kartzeleroen presentziarik gabe zituzten gune eta momentu bakarrak. Mezaren esanahi sakonena desitxuratzea zen, haien ustez, egun eta gau kartzelero begiluzeen begiradapean egon behar eta mezakoa soilik izatea testigurik gabeko tartea. Horrela, bada, jatorduetatik eramandako ogi puskaz eta ardo apurraz, logelan, oheratu aurretik, meza igandeetan bakarrik ematea erabaki zuten.

Ez dago zehaztu beharrik kartzelako bidegabekeriei, kartzeleroen gehiegikeriei, komunikazioen eta liburuen zentsurari, Euskal Herrian ala Euskal Herriari lotuta jazotzen ziren arazoei, kartzelako egoera itogarriari, azken baten, protesta, planto, gose-greba eta abarrekin erantzuten saiatzen zirela. Harrokeria barik esan ahal da bide burutsuak asmatu eta erabili ere egin zituztela horretarako.

Konkordatu Kartzelak ezer ganorazkorik egiteko ez azpiegiturarik, ez baliabiderik, ez gune fisikorik ez zuenez... eta gauez bonbilla baten argipean lo egin behar... baketsua izatekotan ezin baketsuagoa zitekeen *plantoa* egitea ere erabaki zuten: ezarritako orduan ohetik ez jaikitzea, hain zuzen. Eta, jakina, han azaldu zen kartzeleroa banan-banan denei jaikitzeko aginduz. Xelebrea Andreu Vila jesuita katalanak kartzeleroarekin izan zuen elkarrizketa:

*–Y ud., sr. Andreu, ¿por qué no se levanta?*

*–Porque tengo insuficiencia sexual.*

*–Eso qué...*

*–¡Que tengo insuficiencia sexual!*

*–Pero eso no...*

*–¡Que no se me pone en los c... levantarme a esta hora para no tener nada que hacer durante todo el día!*

Intsumisio jarrera horrek ihes egiteko tunelarekin eta Konkordatu Kartzelaren gezurra eta fartsa erakutsarazteko egindako mutinarekin jo zuen goia. Ongi merezitako azkena izan zuen kartzela malapartatu hark.

Kartzelaldia etengabeko borroka-bidetzat hartzeak sortzen duen tentsioak ezinbesteko ditu noizbehinkako arnasbide batzuk. Bere txiki eta xumean, berezia zelakoan, oheratu aurretik, egunero, egiten zuten erritua aipatu behar. Txomin Artetxeri bururatutako ekintza. Tente eta ilaran jartzen ziren guztiak; Nikola Telleria, *komandante* izendatua, aurrez aurre, serio. *Eusko gudariak, zutik! Iskiluak bizkarrera! Bat, bi, hiru...* desfilerako deiak egin eta gero, Josu Naberan, ikurrina –antzeko koloreak zituen eskuzapiarekin ordezkatu behar– hartuta aurrendari zutela, hasten zuten, kantuz, desfilea:

*Eusko gudariak gera, Euskadi askatzeko*
*gerturik daukagu odola bere alde emateko.*
Irrintzi bat entzunda mendi tontorrean
goazen gudari danok ikurrinen atzean.
*Eusko gudariak gera...*
Fazistak datoz eta Euskadira sartzen
goazen gudari danok geure aberria zaintzen.
*Eusko gudariak gera...*
Ez dirade sartuko, ez, Euskal Herrian
eusko gudariren bat zutik dagon artean.
*Eusko gudariak gera...*

Gerrate zibilean frontean ibili zen Basilio Pujana Zeanuriko bertsolariak asmatutakoak dira, gutxienez, azken bi ahapaldiak.

*Komandantearen* eta, noski, taldearen eguneko aldartearen arabera biziagoak ala motelagoak izan ohi ziren *Gora!* batzuk oihukatu, ohera sartu aurretik oinak berotzeko zenbait harat-honat egin lotegiko alde batetik bestera egin edo mus jokaldi batzuk –kartak eta harri-koxkorrak euren esku izan zituzten arte– jokatu eta gero oheratzen zen Zamorako apaiz presoen batailoi atipiko baina gogotsua.

### 3. Eliz hierarkiarekin harreman tirabiratsuak

1936ko altxamendu militarraren ondorengo gerratik sortutako diktadurari Eliza Katolikoak emandako legitimazioa,

babesa eta laguntza Eliza horren historiaren garai beltzenetan kokatu beharreko garaietako jardunak dira.

Mila bederatziehun eta berrogeita hamargarreneko hamarkadaren azkenalditik aurrera, euskaldunen belaunaldi berri bat –katea ez zen eten– ausartu zen diktaduraren errepresioari erantzuten.

Eliz inguruetara ere iritsi zen emasabel beretik sortutako belaunaldia. Bere gabezia eta akats guztiekin, herriaren eta herritarren bidelagun izaten jakin izan duen euskal kleroak, behe-kleroak bederen, hausnarketa teologiko handirik ez zuen behar izan ataka horretan zeinen alboan eta zeinen alde lerrokatu behar zen erabakitzeko.

Aurreragoko urteetan euskal elizbarrutietako gotzainen jokabidea, Euskal Herriak pairatzen zuen errepresioari buruzkoa, zer-nolakoa izan zen jakintzat emanda, Zamorako Konkordatu Kartzelak iraun zuen urteetan eta bertan zigorrak bete zituzten apaizen aferetan Eliza instituzionalak erakutsitako zenbait jarrera aztertu nahi ditugu.

Kartzela hartatik igarotako apaiz eta fraideak 53 izan ziren. Horietatik 40 euskaldunak: 31 bizkaitarrak eta 9 gipuzkoarrak. Gurpide gotzaina hil zenean, Jose Maria Cirarda izendatu zuten Bilboko elizbarrutiko Administrari Apostoliko (1968-11-19 / 1971-12-19) eta bere gotzain-aldian gertatu ziren espetxeratze guztiak, 1972. urtean egindako bi izan ezik.

Hainbat idazki argitaratu ziren, apaizen atxilotze eta epaiketen karietara, urte horietan: Bilboko Gotzaindegiko Prentsa Bulegoaren Oharra (1969-IV-24); Jose Maria Cirardaren Exhortazio Pastorala (1969-V-4); Bilboko Gotzaindegiko Prentsa Bulegoaren Oharra (1969-X-23); Jacinto Argaia eta Jose Maria Cirardaren *Gure eleizbarrutiak gaur: nekeak eta itxaropideak* izeneko Gutun Pastorala (1969-X-26); Bilboko Gotzainaren eta Abadeen Kontseiluaren idazkia (1970-VI-6); Gotzainaren gutuna abadeei (1970-XI-5); Bilboko Gotzaindegiko Prentsa Bulegoaren Oharra (1970-XI-18); Bilboko eta Donostiako Gotzainen gutun bateratua (1970-XI-21).



Hainbeste dokumenturen artean gauza asko esaten dira, jakina, eta, beraz, hari-mutur asko leudeke argitu eta zehaztu beharrekoak. Dena dela, badira bizpahiru puntu, gure ustez, larritzat jo daitezkeenak.

Hainbeste apaiz atxilotu izan arren, on Jose Angel Ubietaren –atxilotua baina ez espetxeratua– izena besterik ez da azaltzen dokumentu hauetan guztietan eta haren pertsonaren eta jokabidearen aldeko defentsa argia egiten da (Bilboko Gotzaindegiko Prentsa Bulegoaren Oharra: 1969-4-24).

Beste apaizen izenik ez da azaltzen eta euren jokabide eta ekintzak delituzkotzat jotzen dira: «Min aundia emoten deuskue, une honetan geien minduta dagozan anai arrebak:... barruan dagozanak, delitu edo lege-austeen errudun direalako, edo Justiziak euron epaiketa asi daualako...» (Exhortazio Pastorala: 1969-V-4); beste horrenbeste apaizen arteko konparazioak egiterakoan: «Neure eginbearra da, ta arin egitekoa, urrengo au garbi esatea: Bizkaiko abadeak, geien-geienak, birtutez beteak direala, jainkozaleak, beargìnak, eskuzabalak, euren Obispoagaz zintzo alkartuak, euren herriaren maitaleak, baina mundu osoarentzat biotz zabalekoak;... Baina dan-danok gara pekatari, eta gure artean be –abadeon artean– izan leitekez lege-auste onen edo orren errudunak. Bere abade-bizitzako balioak itzulietara (iruntzietara) dituanen baten bat be izan leiteke» (ibidem).

Urte haietan gertatu ziren herritarren eta apaizen atxilotzeak eta epaiketak Euskal Herriak gizaldietatik pairatzen duen ukazioan eta ukazio horrek abagune historiko horretan bizi zuen egoeran kokatu behar dira, ezinbestean. Dokumentu hauetan, aldiz, behin ere ez dira aipatzen ez Euskal Herriaren izaera eta herri-nortasuna, ez herriaren eskubide kolektiboak, ez diktaduraren errepresio krudela. Gure herriko pluraltasuna, gai politiko, sozial eta erlijiosoei buruz batzuen eta besteen arteko iritzi kontrajarriak, konkordatuaren interpretazio eta aplikazioari buruzko tirabirak hartzen dira egoeraren azterketa egiteko gako nagusitzat. Eta herritarrei argibideak eta

jarraibideak ematerakoan, «gogoeta sakona, gogo-bihotzen sosegua eta otoitza» aipatzen dira eginkizun nagusitzat.

Bada beste arazo bat, oso-oso larria izanik, gure eliz hierarkiak ikusi nahi ez duena: torturen arazoa, hain zuzen. Alberto Gabikagojeaskoak, Konkordatu Kartzelako lehen maizterra izan zenak, 1964ko azaroan, Ibarruriko Ajurian eta Muxikako Areatzan egindako sermoia aipatu behar. Albertok argi eta garbi salatu zituen, bere sermoian, sei gaztek eta gizon heldu batek jasan behar izan zituzten torturak.

Ez da hori, tamalez, gure gotzainen jokabidea. Asturiasko Mogrovejo herrian, 1969. urteko apirilean, atxilotu eta Bilboko komisarian bost egunez inkomunikatuta eduki zuten Jon Etxabe, beste atxilotuak bezalaxe, tortura latzak sufriaraziz. Giputza denez eta ETAko kideekin batera atxilotu zutenez, Bilboko gotzainak ez zuen, nonbait, bere eginbehartzat hartzen Jon Etxaberen –ez harekin batera atxilotuen– torturak salatzea.

Ez Jon Etxaberenak bezainbestekoak, baina egun bertsuetan atxilotutako apaiz bizkaitar batek ere, Martin Orbek hain zuzen, sufritu behar izan zituen Bilboko Indautxuko komisarian jasandako torturak: era guztietakoak eta gorputzaren edozein partetan emandako kolpe bortitzak, lehenik; bortitzak izanik ere, kolperik kolperako tartean, atxilotua berrindartu egin ohi da eta, normalean, ez du ezer *kantatzen.* Belaunak aurrerantz doblarazi, gorputz osoa makurrarazi eta eskumutur biak belaunen atzealdetik eskuburdinaz lotu eta poliziak nahi izaten duten abiaduran ibilarazi, gero; horrela, atxilotua lehertu arte eta hitz egingo duela esan arte; *«el gusano»* eta *«el paseillo»* deitzen zioten euren argotean; honelakoa bezalako jarraikako torturen aurrean, atxilotu bakoitzaren indarren arabera baino ezin da iraun. Ondoren, *«el quirófano»* deitutako tormentua: mahai batean aratinik etzanarazi, gerritik gorakoa mahaiaren ertzetik zintzilik jarri eskuekin mahaiari heltzen utzi gabe; egoera horretan era guztietako kolpeak, noiz, nondik eta nolakoak izan zitezkeen atzemateko



betarik gabe, sabelaldean batez ere, ukabilez, telefono aurkibideko liburukotearekin eta abar.

Tortura psikologikoak aparte: behin eta berriz aurpegiratu egindakoak argi erakusten zuela apaiz duintasun-gabea zela; nahi lituzketela jakin beste alor batzuetako jokabideak... Torturen bidez nahi dutena esanarazi eta gero, atxilotuak ustez adoretsuak direla baina denek amore eman behar izaten dutela esanez trufatzen dira, horretarako beraiek dituzten bitartekoak hutsezinak direla aldarrikatuz; inpunitatez eta harrokeriaz, ozenki, esan eta errepikatzen dute beren doilorkeria eta krudelkeria.

Kontua da torturatua izan eta hamabi egunetara –hiru komisarian eta bederatzi Basauriko kartzelan inkomunikatuta– berarekin batera espetxeratutako apaizkideek ipurmasailak zartagina bezain beltz zituela esan zioten Martini.

Inkomunikaziotik irtendako egunean bertan edo hurrengo egunean joan zen Cirarda gotzaina Basauriko espetxera apaiz espetxeratuak bisitatzera; lehenengo bakarka eta gero guztiekin hitz egitea eskatu zuen. Ea tratu txarrik eman al zioten galdetu zion Martin Orberi, agurtu eta berehala. Baietz erantzun zion Martinek; eta torturen frogarik ezin eduki izaten dela argudiatu ez dezaten, oraindik zituen markak erakutsiko zizkiola gaineratu zion; eta prakak askatzen hasi zen. *«No, no hace falta; ¿cómo no le voy a creer a un sacerdote mío?»*, izan zen Cirardaren hitzez-hitzezko erantzuna.

Aipatutako elkarrizketa 1969ko apirilean izan zen. Urte bereko urriaren 26ko datarekin, *Gure eleizbarrutiak gaur: nekeak eta itxaropideak* Gotzain Idazki luzea argitaratu zuten Jacinto Argaia Donostiako gotzainak eta Jose Maria Cirarda Billboko Administrari Apostolikoak. Begira torturei buruz zer dioten idazki horretan:

«Gure IKUSTE onetan ezin ikutu barik itxi berariz labana dan puntu bat. Naiz ta jakin legeak ori galazota daukeela, zabal dabil askoren artean onango zurrumurru au: detenidu batzuk, presondegietara sartu aurretik, portu (sic) txarra artu

dabela. Naziñoko albistariak bere agertu eben zurrumurru ori, prolema (sic) ori aitatzen dauan O.I.T.-en Agiria argitaratuz edo aitatuz.

Ori egia balitz, zuzena ez dan gogorkeria erabili dabe agintarien serbitzari batzuk. Ori oiñarribakoa ta geitua dan neurrian, agintarien kontrako propaganda da-ta, zuzena ez dan gogorkeria izango litzake.

Ez da gauza erreza egia zeatz jakitea, batzuk ukatu ta besteak baieztu egiten dabenean eta, gauzok direan langoak direalako, sekretuak ainbeste indar daukenean. Baiña datu ori ezin aintzat artu barik itxi, naiz-ta guk gorago esan, IKUSTE onetan egite ziurrak baiño ez genduzala erabiliko; izan bere, zurrumurru ori zabaldu dana, or dagoan egite bat da, ta aitaturiko gogorkeri giroa gogortzeak asko be asko zor deutso orri» (Argaia, J., Cirarda, J. M., 1969).

Atxilotzeen eta epaiketen ondoren jasan beharreko kartzelaldian ere ez ziren hobetu hierarkiarekiko eta eliz erakundeekiko harremanak. Cirarda gotzaina joan ohi zen, noizbehinka, Zamoran espetxeratutako apaizak bisitatzera. Apaizek –euren zigorra monasterioren batean betetzea lortu nahi zutenek, salbu– argi eta garbi jakinarazi zioten lehen-lehenik, Euskal Herriak pairatzen zuen zapalketa politiko, sozial eta kulturalaren aurrean Elizak eman beharreko erantzuna gidatzea zela gotzainarengandik espero zutena; zapalduen eta esplotatuen ondoan ikusi nahi zutela Eliza; zorionez, bazutela gizatasunezko hurbiltasuna eta laguntza materialak norengandik jaso. Jarrera hau azaldu eta gotzainaren erantzunik eza ikusi eta gero, Cirardaren bisitetara ez joatea erabaki zuten.

*Nori berea, gizalegea* dio esaera zaharrak. Cirarda gotzainari ere egindakoa ezin ukatu. Burgosko Prozesu ezaguna, bi apaiz inputatu tartean zirela eta, publikorik gabe egitekotan ziren, apaizak epaitzerakoan publizitaterik ez dela izan behar eskatzen duela Konkordatuak argudiatuta. Apaiz inputatuek eta beste inputatu guztiek, abokatuek, inputatuen senideek, eta abarrek epaiketa publikoa izatearen alde egiteko eskatu



zieten, bai Cirardari eta Argaiari, eta bai beste zenbait eliz agintariri ere. Eta Cirarda, horretan bai saiatu zen. 1970-XI-5eko datarekin elizbarrutiko apaizei gutuna zuzendu zien eskaera horren egokitasuna azalduz eta hori lortzeko gestioetan ari zela jakinarazteko. 1970-XI-21eko datarekin, Donostiako gotzain Jacinto Argaiak eta biak argitara eman zuten gutun bateratuan, eskaera hori bai Vatikanoak eta bai Estatuko Gobernuak onartu izanaren berri ematen zieten herritarrei. Epaiketa epaitegi arruntean egiteko eta edozelako epaitegitan eginda ere, inputatu batzuentzat eskatzen zituzten heriotza zigorrak ematekotan zigor horiek kommutatzeko eskaerak ere eginak zituztela azaltzen zuten gutun berean.

Antonio Añoveros izan zen Bilboko gotzaina 1971ko abenduaren 19tik 1978ko irailaren 25era. Joan zen hura ere Zamorako apaizak bisitatzera. Cirardari jakinarazitako jarrera bera erakutsi zioten honi ere. Erantzuna, erantzunik eza, zehatz esateko, berdintsua. Hor amaitu ziren bisitak.

Egiaren faboretan esan behar da, Antonio Añoveros Euskal Herriaren identitate eta eskubideen eta horiek zaintzearen eta garatzearen alde eta horretarako Euskal Herriak zituen eragozpenen kontra argi eta garbi azaldu zela, 1974. urteko otsailean, Bizkaiko parrokia guztietan irakurtzeko homilia banatu zuenean. Gai sozio-ekonomikoei eta politikoei buruz, Idazkaritza Sozialaren aholkularitzaz, katekesi gisa prestatutako hiru gaietatik azkenekoa izan zen. *«El cristianismo, mensaje de salvación para los pueblos»* izeneko katekesi hau *el problema vasco* aztertzeko asmoz prestatua zen. Honatx Euskal Herriaren identitatearen aitortza: *«El derecho de los pueblos a conservar su identidad incluye también la facultad de estar dotados de una organización socio-política que proteja y promueva su justa libertad y su personalidad colectiva.*

*Sin embargo, en las actuales circunstancias, el pueblo vasco tropieza con serios obstáculos para poder disfrutar de este derecho».*

Ondoren, ozen, aldarrikatzen zuen, Vatikanoko II. Kontzilioaren irakaspenei jarraituz, Jaungoikoak eskaintzen duen salbazioa eta bizia gizon-emakume guztiei eskaintzeko, Elizak herri orotan txertatu beharra duela. Txertatu ere, *«con lazos estables de vida cultural»* (*Ad Gentes*, 10) eta *«para que los fieles puedan ser fructuosamente testimonio de Cristo... siéntanse miembros del grupo humano en el que viven y tomen parte en su vida cultural y social»* (*Ad Gentes*, 11) (*Antonio Añoverosen biografia*, 163-168 orr.).

Antonio Añoveros gotzaina eta Jose Angel Ubieta elizbarrutiko bikario nagusia atzerrira eramateko hegazkina Sondikako aireportura bidaltzeraino haserretu zen Francoren gobernua. Apaiz, kristau eta herritar askok eta askok urte luzeetan izan ez zuten argibidetzat hartu zuten homilia hura. Apezpikuaren aldeko mugimendu herritar jatorra jarri zen abian. Pena izan zen argi eta garbi inoiz azaldu ez zen konponketa diplomatiko baten bidez amaitu zela afera. Beste behin pikutara joan ziren gizon eta emakume zintzo askoren itxaropenak.

Ez zuten atarramentu hoberik izan Jose Maria Setien Donostiako gotzain laguntzailearekin. Zamoran espetxeratutako euskal apaiz guztiak preso politikoak ziren. Behin eta berriz eta modu askotara eskatu zuten preso politikoak zeuden kartzeletan bete nahi zituztela zigorrak. Ez agintari zibilek ez eliz hierarkiak ez zieten jaramonik egin. Egoera puntu horretara iritsita, ahal zuten ekintzarik gogorrena egitea pentsatu zuten, matxinada bat egitea, hain justu, txikitu ahal zuten guztia txikituz eta kartzelari su emanez. Ekintza hori egin aurretik, Setien gotzainari deitu zion Jon Etxabe apaiz gipuzkoarrak, azken aukera agortzeko asmoz, ekintza nolakoa izango zen zehaztasunik eman gabe, azkeneraino joateko prest zeudela azalduz. Setienek ez zuen ezelango gestiorik egiteko asmorik erakutsi. Areago, uko egin zion papertxo batean mezu bat idatzi eta kalera bidaltzeari.



Ez ziren izan anaikorragoak Euskal Herritik kanpoko eliz estamentu eta hierarkiarekin izan zituzten harremanak. Guzti-guztien jokabidea bat zetorren ez bakarrik kartzela erregimenarekin, baizik eta, oro har, apaizei kartzela zigorrak ezartzeko TOP epaitegiaz eta epaitegi militarrez baliatzen zen aparatu estatalarekin. Hiru instantziatan nabarmendu zen jokabide hori.

Lehenengo instantzia Zamorako lekuko Elizarena izango litzateke. Eta hor kartzelako kapilau don Clemencianoren jokabidea legoke; ez zuen, ez, erakutsi bere izenarekin bat letorkeen bihozberatasunik; edozein funtzionario bezain funtzionario, edo okerrago, jokatu zuen. Izan ere, kartzelako Erregimen Batzordeko kide izanik, behin ere ez zen desmarkatu, apaiz presoei zegozkien gorabeheretan, Batzordearen erabakietatik. Adibide askoren artean, bat nabarmentzearren, honako hau aipa daiteke. Apaizek Paulo VI.a Aita Santuari bidali nahi zioten gutun bat aurkitu zioten kartzelatik irten zen kide bati. Erregimen Batzordeak, *aho batez*, sei hilabeteko erredentzio onurak kenduz zigortu zituen eta, beraz, kartzela zigorra bi hilabetez luzatu.

Zamorako elizbarrutia gotzainik gabe izan zen garaian, bi aldiz hurbildu zen kartzelara Bikario Kapitularrra. Bisita horien ondoren ez zen ezertan aldatu kapilauaren jokabidea. Bikarioak ere uko egin zion Paulo VI.ari idatzitako gutuna ateratzeari, kartzeleroekiko leialtasuna argudiatuz.

Kartzelako maisuari dagokionez, Erregimen Batzordeko kide zen hura ere, eta apaizei helarazteko asmoz kartzelara bidaltzen zituzten liburu eta argitalpenen zentsuratzaile taldekoa. Esanda dago gorago zer-nolako liburuak zentsuratzen zituzten. Eta kontua da maisu hori Zamorako Herri Irratiaren, hots, Elizaren irratiaren zuzendariordea zela. Erraz atzeman daiteke zein informazio eta formazio politika hobetsiko zuen irrati horrek.

Eta, azkenik, zer esan Zamorako apaizgoaz? Bakar baten agurrik ere ez zen iritsi kartzelako hormen barrura. Apaiz

presoek jaso izan zituzten nola senitartekoen bidez hala, inoiz, funtzionarioren baten bidez, langileren baten paketeren bat, bere burua progresistatzat ez zuen apaiz lagunen baten posta bidezko laguntzatxoa, eztei bidaldian Zamoratik pasatu eta apaiz adiskidea bisitatzeko baimenik izan ez zuen bikotearen agurra, bisitatzeko baimenik lortu ez zuen agintari ezagunen baten goraintziak... Zamorako apaizek ezer ez. Ezin adierazgarriagoa haien isiltasuna.

Bigarren instantzia Penintsulako gotzainena izango litzateke, Euskal Herrikoak ere talde horretako kide gisa eroso sentitzen zirela ahaztu gabe.

Estatuaren eta Espainiako hierarkiaren arteko harreman adiskidetsuak ziren gotzainen pentsaera eta jokabidearen adierazgarririk argiena. Gertaera esanguratsuenak baino ez aipatzearren, hor daude urte haietan egindako Compostelako Urte Santua edo Valentziako Eukaristi Kongresuko ospakizun arranditsu bezain mistifikatua; horietan azaltzen zen, mozorrorik gabe, nazional-katolizismoaren zutabe ziren erakunde bien arteko adostasuna.

Zamorako apaiz presoekin harreman zuzenak izan zituztenak gogoratzean, honako hauek lirateke aipatzekoak: Madrilgo Morcillo artzapezpikua, apaizen epaiketan eta espetxeratzean serioski inplikatua; Compostelako Quiroga kardinala, hotza eta koldarra, apaizen ekintza eta jarrerak Ebanjelioaren ikuspuntutik aztertzeari muzin egiten ziona.

Apaizek horrelakorik eskatu ez arren, eta gotzainengandik jaso zezaketena gutxienekora ere iritsi ez arren, argigarria da, apezpikuek pezeta bat bera ere ez zutela jarri apaizek zuten diru kutxa komunerako.

Hirugarren instantzia, Erromako Eliza. Aipagarrienak, zuzen-zuzenean bizi izandako bi gertaera.

Urteetan aritu ziren apaizak garai hartan Vatikanoaren nuntzio zen Luigi Dadagliori elkarrizketa eskatzen, gutunen bidez eta etxekoen ala Zamoratik irtendako apaizen bidez aritu ere. Isiltasuna, saihets-erantzunak eta, inoiz, Echarren Madrilgo apezpiku laguntzaileari idatzitako gutun desatsegina izan ziren Nuntziaturan izan zuten oihartzuna.



Halaz ere, 1971ko urriaren 3an, Buxarrais jaunaren gotzaingintza zela-eta Zamorara joateko parada izan zuenean, obligaziotzat edo hartu bide zuen kartzelako apaizak bisitatzea.

Kartzelako zuzendariak, galaz jantzita eta Erregimen Batzordeko zenbait kartzeleroz –haiek ere galaz, noski– inguratuta, Nuntzioa kartzelan zegoela eta ea harekin egoteko prest zeuden galdetu zienean, baietz erantzun zioten, baina kartzelerorik gabe izatekotan.

Nuntzioaren jasa eta janzkera zaindua harrigarri gertatzen ziren, gela ziztrin batean, hala moduzko ping-pong mahai baten inguruan, egin beharreko elkarrizketan. Horrela ulertu beharko litzateke, beharbada, tabako gorria eskaini eta Jon Etxabek berak *Celtas* erretzen zuela erantzun zionean, Zamorako kartzelan, ez zegoela protokolorako ez aukerarik ez modurik. Horrexegatik, agian, ez zizkien banatu ere egin ekarri zituen estanpak. Pentsatzekoa da apezpikuaren sagaratzearen oroigarriak izango zirela.

Elkarrizketa tirabiratsua izan zen. Garratzenak hiru momentu hauek. Nonbaitetik hasi behar eta, Xabier Amurizak planteatu zion presoak izanik ere edozein gizasemeri zor zaion begirunerako eskubidea bazutela eta, beraz, nuntzio batek kristandadean bakarra zen apaizen kartzela batera egiten zuen bisitak, berez zituen munta eta garrantzia kontuan hartuta, zapalketa ekintza bat gehiagotzat jotzen zutela ezertariko abisurik gabe bisitatzera etortzea. Nuntzioak, diplomatiko petoa izanik, ez zion erantzun.

Ondoren, bai apaizek eta bai euren senitartekoek eta apaiz lagunek Zamorara joateko askotan egindako eskariei erantzunik eman ez izanaren arrazoien azalpena eskatu zioten. Diplomatikoek gezurrak esateko duten baimenarekin, ez zuela horrelako eskaerarik jaso erantzun zien. Apaizek behin eta berriz ekin eta datuak eman arren, diplomatikoak berean

jarraitzen zuen. Horrenbestez, Jose Mari Madariagak, bere haserreari gehiago eutsi ezin eta, ozenki aurpegiratu zion nola esan zezakeen hori, bere bi arrebak eskaera hori egitera berenberegi Madrilera joanak zirela eta. Diplomatikoak gezurrez erantzutean izan zuen patxada berdin-berdinez erantzun zien *egoki iruditu zitzaionean erabaki zuela kartzelako apaizak bisitatzea.*

Zamorako kartzelaren funtsezko arazoa planteatu zioten gero. Konkordatuaren sinatzaileak Espainiako Estatua eta Vatikanoa izanik, eta Zamorako apaizen kartzela Konkordatuaren arauz irekia izanik, nola onar daiteke Estatuak bakarrik erabakitzea kartzelako gorabehera guztiak? Diplomatikoak, jakina, ez zuen azalpenik eman. Diplomaziak bere balioak ditu, noski, baina diplomazia diktadura odolzale tematsuaren bidelagun azaltzen denean, zer pentsa?

Santiago egunean, telebistaz kartzelan ikusitako mezatako ospakizunean, Compostelako Quiroga kardinalak homilian predikatutako zenbait oker teologiko Nuntzioari, zita eta guzti, Mariano Gamo apaiz madrildarrak azaldu eta gero, amaitu zen elkarrizketa. Zamorako kartzelak berdintsu edo okerrago jarraitu zuen. Ikustaldiak, handik egun gutxitara, nahigabeko epilogoa izan zuen: elkarrizketa horretatik hamar egunetara, urriaren 13an, kartzelatik ihes egiteko apaizek egindako tunela aurkitu zuten kartzeleroek.

Bigarren gertaera. Burgosko prozesuaren bezperetan Erromara joan ziren, Aita Santuarekin egotekotan, prozesu hartan zigor gogorren eta heriotza zigorren eskaerak zituzten inputatuen senitartekoak. Horien artean ziren Zamoran preso ziren Jon Etxaberen ama eta Julen Kalzadaren arreba.

Paulo VI.a Aita Santuak ez zituen hartu. Etxeratzeko trenaren zain zeudela, Vatikanoko monsinore bat hurbildu zitzaien, Aita Santuaren partez arrosario bana oparitzeko. Ez zizkioten hartu. Kartzeletan harpidetzaz banatzen zuten *Redención* aldizkariak honela eman zuen bidaia haren informazioa lehenengo orriko albiste nagusitzat: *«El Papa se niega a recibir a los familiares de los terroristas vascos».*



Zamorako kartzelara sartzen zen prentsa urrian, han zeuden apaizek, tarteka-marteka, irakurri ahal izaten zuten Espainiako artista talde bat, kirolari talde bat... hartu dituela Aita Santuak. Inoiz zezenketariak ere bai kardinal batek aurkeztuta. Maria Santisimaren eta zezenen Espainia gogokoago Vatikanoan, herri ukatu eta menperatuen aitormen eta defentsa ebanjelikoa baino.



Apaiz lagunak, Patxi Bilbao Gernikako epaitegira deitzean, 1967an: Pedro Berrioategortua, Txomin Artetxe, Martin Orbe, Alberto Gabika, Ander Manterola, Jon Onaindia, Agustin Idoiaga, Jose Luis Jauregi, Emilio Kortabarria, besteak beste.

# BILBOKO GOTZAINDEGIAN GOSE-GREBA

Josu Naberan

*Maiatzeko egun batez*
*hogeita hamar hain suertez*
*gose greba bat hasi genduan*
*geure borondatez*

HALAXE GERTATU ZEN, XABIER AMURIZAK kantatu zuenez. Bizkaiko bost abaderen erabakia izan zen gose-greba bat hastea. Halaxe sartu ginen Bilboko Gotzaindegiak Mazarredo Zumardia izeneko kalean zeukan eraikinaren sotoko gela txiki batean, 1969ko maiatzaren 30ean.

Ekintza horrekin batera, agiri bat zabaldu genuen torturen eta salbuespen-egoeraren kontra. Estatua bera izendatzen genuen «terrorista», eta hark berak inori ezartzen zion izen beldurgarri hori abade batzuek berari publikoki egozteak min handia eman zion. Hamar eta hamabi urteko kondenak ezarri zizkigun Tribunal Militar batek, ateak itxirik egindako prozedura «*sumarísimo*» delakoaren bidez.

## 1. Aurrekariak

Bilboko Mazarredo Zumardiko ekintza hura ez zen izan ekintza isolatua. Handik egun gutxira ezarri ziguten Gerra Kontseilua ere ez zen izan militar batzuen amorraldi hutsa. Errepresioaren eta ekintzen katea tenkatuz zetorren aurretik, J. M. Arregik arestiko atalean azaldu duenarekin bat. Nolana-



Josu Naberan garaiko argazkian

hi ere, atal horretan aipaturik diren jazoerez gain, bada beste zer aipaturik ere. Hala nola, 1968 hartako Aberri Egunekoak.

Aberri Eguna, 1968an, apirilaren 6an izan zen. Manifestazioak eta atxiloketak gertatu ziren, aipatu bezala. Egun berean, ostera, EGIko ekintzaile iruindar bi hil ziren, manipulatzen zuten bonbak eztanda eginda. Udaberria zen.

Negua iritsi zenerako, jazoerek tentsioa puntu gorenera ekarria zuten egoera, lantegietan, unibertsitatean nahiz kalean. Abade batzuk planteatzen hasiak ginen sermoiak, agiriak eta itxialdiak baino zerbait gogorrago egin beharra zegoela Estatuaren goranzko errepresioa eta Eliza Katolikoaren ohiko isiltasun konplizea salatzeko.

Orduan, polizi operazio garrantzitsu batek Bizkaiko abade talde bat bete-betean inplikatuko du.

Esanda dagoen bezala, apirilaren 9an, Bilboko Artekale 54-3. ezkerrean zain zeuden poliziek tiroka hartu zituzten lau etakide. Bittor Arana, Josu Abrisketa, Mario Onaindia eta Mikel Etxebarria ziren. Azken horrek, zaurituta, ihes egitea



lortzen du. Lehenengo, taxia hartzen du eta Bilbotik urrundu; baina taxilariarekin izandako tirabiran, hura hil eta Mikelek mendian zeharreko ihes luze bati ekiten dio. Guardia zibil aldra handi batek hartuko ditu errepideak eta mendiko bideak, arakatuko ditu hainbat baserri eta zenbait komentu, eta egunetan zehar saiatuko da iheslariaren bila. Orduko prentsak, luzaroan izandako jokabidea aldatuz, notizia lehenengo orrialdeetan mantentzen du, sentsazionalismoari ere bide emanez. Saien hegada tankerak Mikel Etxebarria mendian hilda dagoela adierazten duela ere esango dute. Baina hark, jende askoren laguntzari esker –euren artean abadeak– ihes egingo die azkenean.

Artekaleko operaziotik hiru egunera, Mogrovejo herrian, Jon Etxabe apaiza, Eduardo Uriarte, Jone Dorronsoro eta Enrike Gesalaga etakideak atxilotuko dituzte. Bitartean, ehun lagun baino gehiago atxilotuko ditu Poliziak, abade batzuk tartean; beste batzuek erbesterako bidea hartuko dute.

Antza denez, Gobernuak uste du oraingoan benetan menderatu duela ETA. Hala bada, kaleko borrokei eta euskal erresistentziari amaiera emateko azken oldarraldira joko du.

Kontua da, ostera, komisarietako torturak nabari eta ezagun bihurtzen direla jende guztiarentzat. Eta horrek bultzatu zuen, gehienbat, Gotzaindegian gose-greba egitearen ideia. Lehenago ere gotzainaren egoitzan bi itxialdi labur eginak genituen eta, bagenekien harako bidea.

Gobernuak, bere oldarraldian, *«Bandidaje y Terrorismo»* delako legea bere gogortasun osoz aplikatzea erabakitzen du; militarrei gerra denboran egin ohi zaizkien *sumarísimo*en bidez, kondena astun eredugarriak eta heriotza zigorrak ezartzea. Apirilaren 23ko Ministro Kontseiluak juje militar berezia izendatzen du.

Militarrek, orduan, apaizen aurkako beda zabaltzen dute. Onartezina da kleroaren zati batek legetik at jardutea, esango dute. Jose Anjel Ubieta ere, Gotzainaren hurrengoa bera, atxilo hartuko dute (Jose Maria Cirarda monsinorearen ahalegi-

nak gorabehera), Mikel Etxebarriaren ihesarekin zerikusiren bat duelakoan (Villota, 1985).

Gobernuaren erasoa maila guztietara hedatzen da. Batetik, presoen dispertsio politikari hasiera emango zaio. Horrela, PC, ETA eta PCml-ko kide asko Segoviara eramango dituzte, eta azken horietariko bat odolustuta hiltzen utziko dute ziegan. Bestetik, Maiatzaren Leheneko manifestazioak bereziki gogorrak izan ziren, batik bat Iruñean eta Bilbon, eta manifestariek ere harriak eta molotov koktelak jaurtikiz erantzun zioten Poliziaren erasoari.

## 2. Gose-greba eta agiria

Testuinguru gogor horretan, hain zuzen ere, Gogor izena zuen abade taldeko bost kidek torturen eta salbuespen-egoeraren kontrako gose-greba egitea erabaki genuen, esan bezala, Gotzaindegiko lokaletan.

Orduan gose-greba gauza berria zen. Kartzeletan bai, eginak zituzten. Hortik kanpo, gure inguruan egiten zen lehenengoa zen. Mediku bati kontsulta egin, koltxoi puzgarriak erosi eta hantxe sartu ginen bost abade Gotzaindegiko bulegoetan. Alberto Gabikagojeaskoa, Julen Kalzada, Xabier Amuriza, Nikola Telleria eta bostok ginen. Abade gehiago ere etortzeko zen, baina zenbaitzuek ihes egin behar izan zuten, ezizenez *El Obrerito* zeritzan etakidea erori eta Poliziak Ibar Ezkerreko eliza bateko aldare azpian lau multikopista harrapatu baitzituen. Beste bat, berriz, kontroletik kanpo iritsi zen. Jon Arrizibieta zen, Gorritiko apaiza.

Gu sartu eta gau hartan bertan Paris irratian entzun omen zuen Jon Arrizibietak notizia; eta goizean goiz jaiki eta han dator Nafarroatik, berak ere gose-greban parte hartu nahi zuela eta. Baina gu sartu bezain laster, ateak giltza-buelta bikoitzez itxiak zituzten, eta leihoetan ere burdina lodiak zeuden.



Jose Maria Cirarda gotzaina hurrengo egunean etorri zitzaigun bere bikarioekin, oso haserre bera. *«Ya podíais haber elegido el Hotel Carlton»*, esan zigun. Eta *«vais a ser la rama desgajada de la Iglesia»*, mehatxua bota.

Egia esan, gu ez ginen ez eskumikuaren ez Elizatiko beste ezein zigorren beldur, Elizaren zuhaitza usteltzat baikenuen erremediorik gabe; eta, hain zuzen ere, horixe nahi genuen, enbor ustel horretatik ahalik eta adar lodiena erauzi. Gu polizien beldur ginen, ez Jose Maria Cirardaren beldur.

Laster agertu ziren haiek ere, gotzainari ateak zabaltzeko eskatuz. Bada, Jose Maria Cirarda batzuekin eta besteekin ondo konpondu gurakoa zen, baina batez ere goikoekin. «Printzipioz» ezin zirela sartu esan zien, Konkordatuak debekatzen zielako... «arazo larriren baten kasuan izan ezik». Horrela, epaileari eman zion ea hura «arazo larria» zen erabakitzeko aukera.

Beraz, han datoz poliziak berriro, «arazo larria» zela eta ateak zabaltzeko eskatuz. Eta halaxe ireki zien Gotzaindegiko atea Jose Maria Cirarda jaunak.

Gatibu hartu eta hirurogeita hamabi orduz eduki gintuzten Indautxuko komisarian. Bestelakorik espero bagenuen ere, ez gintuzten egurtu, Mikel Etxebarriaren kasuko abadeekin egin zuten bezala. Beharbada, gure ekintzak eta gure *papertxoak* oihartzun handia izan zutelako, besteak beste Paris eta BBC irratietara helarazteaz arduratu baitziren gure lagunak, eta *papertxo* horrek torturak salatzen zituelako, hain zuzen ere. Edo eliz agintariekin hitzartutako baldintza izan ote zen guri egurrik ez ematea?

Kontua da ez gintuztela torturatu. Baina handik hamar bat egunera, gure abokatuei defentsa prestatzeko astirik ere eman gabe, Gerra Kontseilua egin ziguten militarrek Burgosko kuarteletan, «Errebelamendu Militarra» egotziz eta hamarna eta hamabina urteko zigorrak ezarriz, aintzat kasua. *«Sendas condenas»* dago idatzita aktan. Espero genuen halako

zerbait, baina gutariko batek komentatu zuenez, «bai, benetan *sendoak*» izan ziren.

Jaime Cortezo Vazquez-Duro abokatu madrildarrak, bere ahalegin guztiak gorabehera, gogortada hura saihestu ezin izatea deitoratuz, *papertxoa* ez zela edozein paper esan zigun. *«Es que el papelito se las trae, eh»* izan ziren haren hitzak.

Epaiketa hura egiteko Eliza Katolikoaren baimena behar zuten, kasu honetan Jose Maria Cirarda gotzain jaunarena. Horra bada non datorkigun epaiketa baino egun batzuk lehenago Basauriko kartzelara (hara eraman baikintuzten bien bitartean), esanez, bada, guk gainerako guztien moduan epaituak izan gurako genuela uste zuela, pribilegiorik gabe, eta horrelakoak. Geuk baimena ematea nahi zuen. «Hala da –esan genion–, ez gara pribilegio zale, baina zeu zara kasu honetan busti eta baimena eman behar duzuna, eta hori historian idatzita geratuko da». Busti zen, bai, militarrei baimena emanez busti ere.

### 3. 'Papertxoaren' edukia

*Paper bat geunkan egina*
*laburra baina gordina.*

Horrelaxe kantatzen du Xabier Amurizak jazoera haiei egindako bertsoetan, euskaraz. Ateak itxirik egindako epaiketa hartan, poliziaz eta militarrez soilik betetako gelan, gure agiriko hitzek, gaztelaniaz, bapo astinduko zituzten haien belarriak.

Giza eskubideen zanpaketa, torturak, *«Bandidaje y Terrorismo»* legea eta judizio bereziak, langile grebalarien jazarpena, presoak politikotzat ez hartzea, herrietan «giza ehiza» eta poliziek ordaindutako salatariek giro itogarria sortzea, hedabideek gezurrezko informazioa ematea, hori guzti hori salatzen zuen agiri labur bezain gordinak, eta herriak Estatuari berari «terrorista» deitzeko motibo sobera zeukala, hori ere esaten zuen.



Bide batez, Nazioarteko Gurutze Gorriari ere eskatzen genion hemengo torturatuei buruz ikerketa bat ireki zezan.

*«El escrito de los encausados es falso en su contenido, tergiversando en su exposición, tendencioso en la forma, subversivo en su finalidad, ya que está, en su contexto y redacción, claramente dirigido a promover la rebeldía contra las Instituciones básicas, fundamentales e inderogables de la Comunidad Nacional, Gobierno, Ejército, Leyes vigentes y todo tipo de Autoridad y tendente a desprestigiar a los órganos del Estado, subvertir la paz social, así como incitar y promover acciones directas y violentas contra la Unidad de la Patria, estimulando el separatismo y la desmembración de la nación».*

Horixe guztia dio Sententziaren Aktak (ikus eranskina). Izugarria paper ziztrin batek eragin dezakeen errebolta.

Ordutik 40 urte igaro direla, kondena haren gogortadaren arrazoi nagusia komentatzen, bi arrazoi, behintzat, ikusten dira.

Batetik, militarrek zigor eredugarria ezarri nahi izan zuten. Eta horretan epaiak izan zuen bere eragina, antza, epe laburrera, behintzat. Adibidez, Bartzelonako seminarioan gurekin solidaritatez gose-greban entzerratuta zeuden zazpi apaizek, gure kondenaren berri izan ondoren, bertan behera utzi zuten protesta baketsu hura.

Bestetik, «euskal kleroaren» mamua amaitzea zuten helburu. Edozein motatako erresistentzia erauztera zihoazen (ez ahaztu salbuespen-egoeran geundela), eta ezin onar zezaketen apaiz talde batek legetik at jardutea. Ezin jasan apaizek beren sermoiekin, beren protesta-itxialdiekin, bandera espainola elizan ez onartzearekin eta halakoekin temoso jarraitzea.

Guri bostoi halako kolpea emanez, euskal kleroari hegoak moztea espero zuten.

Epe laburrera beharbada lortu ere egin zuten zertxobait, esan bezala, baina epe luzera, epaiketa horrekin, eta batez ere

Zamorako Konkordatu Kartzelarekin, oinarrizko kristau komunitateen aktibismoa eragin zuten, ez soilik Euskal Herrian, baizik eta Estatuan eta haratago ere bai (Paris, Berna, Berlin...).

Gotzaindegiko gose-greba haren azterketa sakonagora joz gero, argi antzematen da, batetik, euskal kleroaren aurreko ekintzen jarraipena izan zela. Besterik, ostera, zerbait berritzailea ere bazuen. Hain zuzen ere, Eliza Katoliko ofiziala areriotzat jotzen zuen argi eta garbi. «Agintari zibilak eta eliz agintariak egoera errepresiboan hertsiki kolaboratzaileak» zirela genioen dokumentuan. Beraz, ekintza hura ez zegoen Elizari zuzenduta, baizik eta zuzenki Estatuari aurka egitera. Hots, bide batez baino ez zegoen Eliza ofizialaren kontra planteatuta. Jose Maria Cirardari torturak salatzeko eskatzen zitzaion soil-soilik; inoiz ez zuena egingo, nahiz eta bere elizbarrutiko abade batzuk ankerki torturatu.

Izan ere, hamar urtetan zeharreko ekintzetan, 1960ko abadeen dokumentuan hasi eta 1968ko Derioko itxialdian eta bitarteko ekintza guztietan (herri ekintza zein eliz ekintzetan), argi geratu zen Eliza Katolikoaren hierarkiaren jarrera, kontraesantxo txikiren bat salbu. Eliza Katoliko ofiziala botere frankistarekin lerrokatu zen eta hartan iraun zuen.



## HAMABOST METROKO TUNELA ZAMORAKO LURPETIK

Josu Naberan

ZAMORAN PRESO GEUNDEN APAIZOK sarritan saiatu ginen Konkordatu Kartzela deitutako sator-zulo hura eraisten. Mutina ere egin genuen, kartzela erdia apurtuz. Nolanahi ere, eta mutina egin baino lehen, han preso geunden hamahiru lagunek ihesaldi saioa egin genuen, baita ia-ia azkeneraino burutzea lortu ere. Hori 1970 eta 1971 urteen tartean izan zen. Hurrengo lerroetan azalduko ditudan bizipen hauek Zamorako kartzelako tunelaren historia aurkezten dute.

*Ihes egin behar diagu nola edo hala. Derrigorrean sartu gaituztenon lehenengo eginkizuna ihes egiten saiatzea duk. Aizak, has gaitezen entrenatzen. Igo hadi nire sorbaldetara. Eup! Horma arteko karrajua zeharkatu ahal diagu, kanpoaldeko horma hori ez baituk heltzen bost metroko altuerara hor aurrean.*

*Eta metrailetak?*

Horma arteko karrajua, kartzela eta hurbilen dauden ortuak banatzen dituen hamaika metrotako pasabidea, etengabe zainduta dago, grisek eta txapelokerrek txandaka.

*Agian behe-lainoko gau batez... Euretako zeinek izango dik apunteria hobea, txapelokerrek ala grisek? Fokuak indartsuak dituk, baina noizean behin baizik ez ditizkek pizten. Eta une hartan pizten badituzte? Akabo orduan. Eta tunel bat egitea?*




Kartzela konkordatarioaren planoa




Tunelaren krokisa



*Iaz Basaurikoek tunel baten bidez egin zitean ihes. Baina han isurbide nagusia zitean, hemen ez zegok horrelakorik. Zeren ez baituzue pentsatuko karraju zabal hori lurpetik zeharkatzea, ezta? Ala bai? Beno, pentsatu, hausnartu... bazeukaagu horretarako denbora. Bai, horixe duk hemen daukaguna, gainerako guztia falta zaigun arren. Airea bera, ez al duzue sumatzen? Eta nik gosea zeukaat. Funcionarioooooo!*

Zamora, 1969ko negua. Bederatzi presok horrela berba (eta oihu) egin ahal dute, hogei egun eta hogei gau daramatelako entzerratuta 5 x 6 metroko gela batean, gose-greba baten ondoren. Eta ogi zati bat zozketatu berri dute bederatzien artean.

*¿Llamaba alguno de ustedes?*

*Sí, señor carcelero. Que aquí no hay aire. Que nos saquen de aquí. Y que nos saquen a una cárcel normal con los demás presos políticos...!*

*Oiga, pero después de cumplir el castigo podrán ustedes salir al patio...*

Patioa. Tamaina ertaineko leku hitsa, tximinia handi batek kedarrez belztua, non hormatik hormarako joan-etorriak egin daitezkeen. Hogei metro koadro zati hamar. Bertan, 1981 edo 1990era arte, kalkuluak eginez gero.

*Baina jende gehiago ekar zezaketek hona, eta giroa berrizta daitekek kanpoko notiziekin. Hogei metroak zati hamabost orain, minus bost geroxeago... Eta aire kutsatu hori... Aizue, eta tunel bat?*

Zamora, 1969. Den-denak dira apaizak eta pertsona bizidun guztietatik inkomunikatuta dauzkate, Konkordatua delakoaren izenean. Pribilegio gisa inkomunikatuak.

*Hemen beti izango gaituk aurpegi bertsuak, lagun. Eta niri hamar urte bizkarreratu zizkidatek, eta hiri hamabi eta egun bat. Eta zuek biok presta zaitezkete Burgosko epaiketarako. Hementxe usteldu behar diagu bost katuok. Funcionarioo! Carcelero! Aizue, eta tunel bat? Behintzat, barrurago ez gaitiztek sartuko.*

## 1. Tunelaren hasiera: sorpresak eta stop

Jolasean bezala hasi ginen. Ezinezkoa zirudien, baina proba egin behar. Presoaren lehen egitekoa, ihes egiten saiatzea. Garbitegia zen, beheko solairuan, leku gutxien zelatatua, baina atearen giltza kartzelariak zeukan.

*Tira, giltza behar diagu. Agian hortzetako eskuila plastikozkoak balio zezakek. Giltza une batez utzi ohi digun kartzelariaren giltzaren moldea argizarian... Ondo. Bapo funtzionatzen dik. Txirbilaren azpia duk leku ona zulo egiten hasteko. Zuloa. Halaxe deituko zioagu. Lau baldosa kendu. Bai daudela gogor inkatuta! Kolpeka erauzi beharko ditiagu. Daukaguna baliatu behar: harri koskorra, burdina zatiak, inportazioko mailutxo bat... eta atzaparrak eurak. Hori hutsunea geratzen dena! Txikia baina nabarmena. Gure ametsetako tunelaren ahoa izango duk: 40 x 40 cm. Gimnasia pixka bat egin beharko diagu, e lagun! Eta gaur gaueko miaketan aurkitzen badute? Onak gaudek, hasi orduko harrapatzen bagaituzte. Mugi, patioko lau baldosa atera behar ditiagu osorik, hutsune horretan jarri, egokitu... Nahiko ondo geratu duk, txirbila gainera bota, disimulatu, ondo disimulatu...*

Eta lurra aurkitu genuen. Sorpresa atsegina. Lur ona zen, buztin antzekoa eta harri gutxirekin. Aurrera jo zitekeen; 20 zm, metro erdi, metro bat... Aurrera jo eta lurrak ona izaten jarraitzen zuen.

*Baina zer sakonera ote dute hormaren zimenduek? Beharbada, Australiaraino iritsiko dituk, edo laster Duero pareko urarekin egin zezakeagu topo. Horregatik, hobe diagu ilusio lar ez egitea.*

Baina bai, bigarren sorpresa atsegina, metro eta erdi sakondu ondoren, hormaren oinarria aurkitu genuen. Emozioa. Kafea eta *fariak*, ospatzeko. Egiten ari ginena sinesten hasiak ginen. Bi metro pasatxoko sakonerara iritsita geunden. Karrajuan zeharreko sator-zulo horizontalari ekiteko ordua zen.



Baina orduan negua heldu zen, 1970eko negua. Burgosko epaiketa. Jon eta Julen hara eraman zituzten, eta besteok, une haietako tentsioa bizi genuen. Zuloarekin aurrera jarraitu genuen, harik eta Burgostik stop abisua hartu genuen arte. Munta handiagoko ihesa prestatzen ari ziren ETAkoak, eta ez zen komeni gurearekin jarraitzea. Zuloa itxi beharra zegoen denboraldi luze baterako. Kartzelariek edozein unetan miatuko zuten txirbil azpia, ez baitzuten uzten zokondorik noizbehinka miatu gabe. Zer egin?

*Ez zeukaagu denborarik galtzeko. Tramankulu bat egin behar diagu, lau baldosei zementuzko oinarri tinkoa jarri –harginei lapurtutako zementua zeukaagu, ezta?– miaketa kolpeek hutsaren hotsik atera ez dezaten.*

Fruta kaxen taulatxoak desmuntatu, elkarri iltzeekin josi, baldosa kutxa karratua tramankulu luzearen gainean ipini... Zarata gehiegi kartzela barrurako. Bi edo hiru arotzeriako lanetan eta beste guztiak ahalik eta zarata handiena antolatzen goiko solairuan, normalean kartzelariak zebiltzan lekuan. Kantak, bateria eta guzti; ping-pong txapelketak, kartzelariak tarteko; zarata handiko txapelketak eta txapela kentzeko moduko zaratak.

Horretan astebete baino luzeago jardun genuen, baina zuloaren ahoa bikain estalita geratu zen. Atilaren Zaldia ere pasa zitekeen orain haren gainetik ezer igarri gabe.

## 2. Elkar zaintzen

Zer egiten zuten bitartean kartzelariek? Drogatuta al zeuden? Zoritxarrez, ez.

Apaizok geunden departamenduak hiru solairu zituen. Solairu nagusia, bai kartzelariek bai presoek eguneroko bizitza egiten genuena; goiko solairua, guztiontzako logela handi bat zegoena; eta behe solairua, patiora ematen zuten garbitegia eta dutxak barne hartzen zituena.

Kartzelariek ustekabeko mugimenduak egiten zituzten behe solairurantz, benetan arriskua sortzen zuten mugimenduak, norbaitentzako errekaduren bat zutenean edo gogoak ematen zienean. Une erabakigarria. Beti aktiboan zegoen zaintza muntaia frogan jartzen zuen emergentzia.

*Kontuz!* hitza zen gure defentsa mekanismoaren argi gorriak pizten zituena.

*Kontuz!* hitza jaisten zen goitik patiora, handik garbitegira, handik tunel ahora eta hortik tunelaren azken muturrera.

*Kontuz, badator eta. Irten hadi azkar, eta dutxara bizkor, lurrok garbitzera. Itxaron, itxaron. Orain! Horma kontra-kontratik. Eta tramankulua bere lekura, txirbila gainera. Azkar, atea gure giltzarekin ixteko.*

Hiru edo lau minutu behar izaten genituen; kartzelaria nola edo hala gerarazi, edozein gauza asmatuz. Behin, komun zulo batetik lurra botatzen ari zenak kaka-larri zelakoa egin eta prakak jaitsi zituen, aurreko komun zulora txiza egitera zetorren kartzelariak atzera egin zezan eta lurrez betetako kaxa ikus ez zezan. Hura estura!

Halako ustekabeak saihesteko, solairu nagusiak giro sosegatu eta lasaia genuen sortua. Kartzelarien eta presoen arteko solasaldi luzeak, xake eta bestelako partida amaigabeak, giro eztia, hitz batean.

*Esaten nian ba nik, familiaz eta ostantzekoz hainbeste interes erakuste hura...*

Lastima azkenean hain adiskidantza sendoak haustea. Kontua da urtebete osoan zehar gure zaintzaileen pauso, zirkin eta pentsamenduak eurak ere kontrolatzea lortu genuela. Hainbat unetan galdutzat jo genuen gure sekretua, baita zortea izan ere, azken egunean izan ezik.



## 3. Uda ahantzezina 1971koa

Geldialdiaren ondoren, 1971ko uda heldu zen, eta gure zuloa berriz zabaltzeko aukera eta erabakia. Zulo ahotik irten zen hezetasun hatsak atzera eragin zigun.

*Ez zegok zereginik! Ura zegok hor behean! Ulertezina, baina halaxe duk. Egin dezagun behintzat azken proba, ur hori atera eta ea zer gertatzen den ikusi.*

Eta halaxe ekin genion, denboraren erdia ura ateratzen eta beste erdia zuloa zabaltzen eta ixten. Harik eta deskubritu arte kalefakzio-galdararen ihesa zela. Matxura konpondu ondoren, lanegunak (kartzelari nagi edo geldoen arabera) gero eta emankorragoak gertatu ziren.

*Aizak, lehen hormatik metro eta piku egin diagu aurrera. Ondo goazak! Txarrena, buruko min itzela egiten zaidala hor barruan. Baita niri ere, erdi zorabiatuta irteten nauk. Zergatik ote?*

Oxigeno falta zen, jakina. Hamar minutuko txandak egin behar izan genituen, tunela metro batzuk gehiago luzatu zen arte. Baina orduan, tunelaren altuera eta zabalera ez zen iristen metro erdira ere. Herrestaka ibili behar atzera eta aurrera, aratinik nahiz ahoz behera lurra pikatzen, basaz eta izerdiz blai.

*Aiiii! Zer gertatzen duk orain? Kable madarikatu hori... desentxufa ezak azkar! Astindua makala barrabiletan zehar... eta ezin nauk mugitu! Lasai, lasaitu eta hartu arnasa sakon.*

Argiaren kablea zen. Zementua ez ezik, elektrizitate-hari muturrak ere jasoz joan ginen noizbehinka egiten zituzten obretatik. Horrela, denbora eta pazientziarekin, hogei metro luzeko kablea osatu genuen... eta hura guztia tunelean zehar hedatu. Zuloa aurkitu zutenean eta kableari tiraka hasi, hura oso gauza serioa zela kargutu ziren.

## 4. Isurbide estu samarra, baina irensle ona

*Eta zer egin duzue lurrarekin, jan egin al duzue?*

*Errespetu pixka bat, epaile jauna.*

Baina epaileak ezin zuen ulertu guk ateratako lur tonak zelan desager zitezkeen arrastorik utzi gabe. Izan ere, lurra zen hango protagonista nagusia. Batzuetan gogor eusten zion, eta orduan zentimetro gutxi batzuk baino ezin aurreratu; beste batzuetan, ostera, bigun portatzen zitzaigunean, metro erdi aurrera. Baina ez zen komeni bigunegia izatea ere, lur-jausirik gerta ez zedin. Lur-jausia. Ametsetan ere agertzen zitzaigun obsesioa.

Gero, lur hura guztia tunelean zehar garraiatu. Hantxe etortzen zen dotore zulo ahoraino, kordel punta batetik tiratu eta zoruan bapo irristatzen zen Gaza esnearen plastikozko halako kutxa baten barruan, biragune eta guztiko tunelean zehar.

*Aizak, begira lur arrasto horiek patioan! Ken itzak jertseko lur orban horiek. Adi, arratoiak lurra ateratzen ari dituk beheko komunetan eta! Denak zeukak lur kolorea hemen, baita gure lurrazalak berak ere.*

## 5. Kanpoko horma

Basa, itxaropen eta egun birik behingo ustekabeen artean, aurrera zihoan hasiera batean ezinezkotzat geneukana. Baina, egia esan, nahiko nahastuta geunden. Argi kablearen arabera, hamabi metro generamatzan (bihurguneen deskontuarekin), baina ez zegoen kanpoko hormaren arrastorik.

*Ea ortuetaraino heldu garen, gero. Karraju madarikatu honek ezin dik eduki bederatzi metro baino gehiago. Ez ditiagu egin, ba, kalkulu gutxi!*

Izan ere, kalkulu ez gutxi eginak genituen. Eguzkiaren gerizak 20 cm-ko hainbat harlauzatan zehar egindako ibilbi-







Zamorako apaiz-kartzela

dearen denbora metroetara aldatuta, eta abar eta abar. Kontua da, guk zazpi metro matematikoki kalkulatu arren, karraju madarikatu hark hamaika metro garbi zituela! Urduritasuna areagotuz zihoan, harik eta egun santu batean...

*Aurkitu diat! Honek zementu hotsa ateratzen dik!*

*Seguru hago?*

*Bai, itxaron. Bai! Kanpoko horma duk!*

*Etor hadi behingoan. Gaurkoz nahikoa duk eta. Hau ospatu beharra zagok!*

Bai ospatu genuela, *faria* eta guzti. Eta hurrengo egunean entrenamenduak egin ere, arrastaka, behatz puntetan. Ortua zeharkatuko genuen, zuhaixketara heldu, eta han, gure

kanpoko lagunen esku jarriko ginen. Gure kanpoko lagunak. Hura zen beste muntaia, eta ez makala.

## 6. *Osaba Joxe*

*Gaur Osaba Joxe etorriko duk. Bigarren horma zeharkatu dugula esan behar zioagu, prest egon daitezela gure bila etortzeko. Zein egunetan esango diogu? Itxaron ea...*

*Osaba Joxe*, 1970eko urtarrilaren 6tik 1971ko urriaren 13ra arte Zamorako kartzelan lehen mailako protagonista izan zen *walkie-talkie* edo irrati-telefonoaren goitizena.

Aski genuen izen propio arrunt hori bisitetan edo gutunetan aipatzea gaineko egun jakin bateko gaueko hamarretan –logelan giltzapetuta uzten gintuzten orduan– hain pertsonaia maitagarri hori aurkez zekigun puntualki Carrascalerako errepidearen 2. kilometro inguruan, Duero ibaiaren handiko ertzean, gure logelako leihatilaren aurrez aurre.

*Osaba Joxek* zementuzko murru fokoz argiztatuen gainetik jauzi egin, hango zaintza oztopo guztiak gainditu eta interferentziarik gabeko elkarrizketa bati ematen zion hasiera. Emozio, sintonia eta elkar ulertze bete-betekoaren tenperatura goria kartzela barruko walkiaren eta Dueroz handiko talkiaren artean. Bi aparatuek sintonizatu zuten lehen egunean, Errege Eguna, hain izan zen handia barruko entzulearen zirrara, non ahots totelez errepikatzen zuen mekanikoki kanpokoaren agurra: «Hemen Osaba Joxe, hemen Osaba Joxe...». Gero mezuak papertxo batean apuntatzeari ekin zion.

Osaba Joxe*k esan dik egun batzuk egin dituela kartzela atzeko tontortxotik mugimendu guztiak zaintzen. Kanpoaldeko bonbilla, gure irteerako zuloaren parekoa, fundituta dagoela. Handik zuhaixketara hamar bat metro daudela...*

*Osaba Joxe*k garitetako guardien mugimendu guztiak zelatatzen zituen.



## 7. Eta kanpoko argia ikusi genuen

Kanpoko hormaren zimenduak zeharkatzea izerdi tanta lodiak kostatu zitzaigun. Metro bat gehiago sakondu behar izan genuen. Lurra, tarte hartan, oso gogorra zen eta, eskukada batzuk ateratzeko ordu erdi behar zen. Baina, azkenean, zimendua zeharkatu eta kanpoaldeko bi metroetan gorantz gindoazen, astiro eta kontu handiz, baina aurrera ihesaren ahorantz.

*Konturatzen al haiz? Kartzelatik kanpo gabiltzak jada. Kontuz, ez ezak lar zabaldu hor goian. Eta taketa ipintzea goiari eusteko?*

Tunelaren mutur batetik bestera hitz egiten genuen, zeren, hamabost metroko distantzia gorabehera, oso ondo entzuten zen. Eta, azkenean, hitz magikoa.

*Argia, argia! Utzi horrela, ez ezak zabaldu gehiago. Kanpoko argia ikusi diat!*

Emozioa isila bezain trinkoa da orain. Zulora inoiz sartu gabeak, tunelean zehar herrestan egiten ikasi, gaueko zaintza areagotu... Gaueko zaintza! Hiru hilabete baino gehiago generamatzan gaueko zaintza hura txandaka egiten leihatilatxoetatik. Garitetako guardia aldaketak, fokuak karrajura zuzentzen zituzten uneak. Den-dena apuntatzen genuen.

Gauetan, tentsioa zen nagusi. Edozein zaratak artegatzen gintuen, batez ere garbitegian zebiltzala sentitzen genuenean, han-hemen baldosak kolpatzen, inguru osoa miatzen. Gau guztietan egiten zuten miaketaren bat.

*Etorri gure bila datorren ostiralean. Txanda. Hemen barruan dena zeukaagu prest. Txanda. Egun egokienak 13a, 16a eta 19a dituk. Hamahiruan oraindik ilargia zegok, ostiralean etor zaitezkete. Txanda. Ados, orduan ostiralean, urriaren 16a, gaueko zortzietan. Txanda. Bi ordu zeuzkaagu alarma eman aurretik. Prest al duzue guztia hor kanpoan? Txanda. Bai, guk hobe diagu xehetasunak ez jakitea, hori zuen kargu. Bazekiagu non izango zaituztegun zain. Txanda eta kito.*

*Xehetasun* nagusiak bi ziren. Bat, Zamoratik kilometro gutxitara zegoen arren, Portugalgo muga baztertzekoa zen; bi, Salazarren diktadurak ez zigun utziko inolako mugimendu askatasunik. Kanpoan ihesa antolatu zuen taldetxoak zenbait babesleku zituen prest. Etxe bat Zamoran bertan, soilik emergentzia kasuan erabiltzekoa, bigarren bat Salamancan eta hirugarren bat Madrilen. Zamorakoa geure kontura oinez aurkitzeko modukoa zen, kartzelariek uste baino lehenago joz gero alarma. Geroago, gauzak baretzean, Madrildik Ipar Euskal Herrira aldatzea zen asmoa.

## 8. Asteartea eta hamahiru

Urriaren 13an *Osaba Joxe* beti bezala geneukan zain Carrascalgo bidean. Alferrik jardun zuen dei eta dei, orduetan zehar, hainbat aieru eta estutasun tarteko. Barruan zer gertatzen zen ez jakiteaz gain, Poliziak deiak lokalizatuko ote zituen beldur ere bai baitziren. Kontua da *telefono kideak* ez zuela erantzuten. Orduan, kanpoko lagunek, talkiea jausi zelako hipotesiarekin, ea berriro gurekin zelan konektatu asmatzeari ekin zioten, ihesa gauzatzeko. Hura guztia hareazko gaztelu bat bezala erori zen, ostera, Zamorako prentsak tunelaren deskubrimenduaren berri izenburu lodiekin eman zuenean.

*Kontuz, badatoz!*, abisatu zuten goitik. *Kontuz!*, transmititu zen patiotik garbitegira.

*Aizak, badatozela honantz! Irten hadi berehala eta azkar dutxetara. Ez, itxaron, antza gainean zauzkaagu eta. Gera hadi barruan, txirbila gainera botatzera goazak eta. Har ezak arnasa lasai, berehala zabalduko diagu eta.*

Kartzelaria, oraingoan, oztopo guztiak gainditu eta zuzen-zuzen zetorren garbitegira. Zergatik? Agian susmoren bat, berak edo besteren batek gure mugimendu arraroren bat hautematean? Ala bihozkada bat besterik ez? Inoiz ez dugu jakingo. Garbitegian sartzean txirbil meta bere lekuan aurkitu



zuen, baina han gu, ingurua garbitzen genuelakoa egiten, eta hainbat hauts ikusteak, ezer onik ez zion bururaraziko.

Zerbait gordetzen ote genuen txirbil azpian? Paperen batzuk, irratiren bat akaso? Tunelarena ez zitzaien bururatu ere egin, harik eta euren begiekin ikusi zuten arte, eta orduan ere kostatu egin zitzaien hura guztia irenstea. Kartzelari hura ezer esan gabe joan zen, baina handik minutu batzuetara lagun gehiagorekin bueltan etortzeko.

Bien bitartean, minutu gutxi haietan, zulo ahoa estaltzeko betiko operazioa egin genuen arrapaladan, hots, tramankulua zuloan kokatu eta tinko jarri, eta horren ostean zirrikituak basaz eta zementuz estali. Eguneroko egitekoa zen, zaila baina behar-beharrezkoa, hamar minutu inguru eskatzen zuena. Ia dena amaituta geneukan haiek eskaileretan behera zetozenean. Nik patiotik ikusten nituen. Txirbila mugitu zuten, eta berriro bere lekuan jartzera zihoazenean, hezetasun marra karratuaz jabetu ziren, alanbre batekin zirrikitua aurkitu, eta gero beste guztia. Bi edo hiru minutu gehiago eta, seguruenik, Zamorako tunelak beste miaketa bat gaindi zezakeen. Harrezkero, azkena.

# ZAMORAKO SUGINTZA ETA MUTINA

Xabier Amuriza

ZAMORAKO MUTINA ETA ONDORENGO gose-greba liburu honexetako beste atal batean irakur daitezkeen bertsoetan kantatu nituen. Horietan kontatzen denarekin bat, gure salaketa nagusia zen han geunden apaizok ez genuela nahi tratu konkordatariorik, hots, elizgizonak bereiz edukitzeko *pribilegiorik*. Hori, bestalde, isolamendu zorrotzagoan edukitzeko aitzakia bat besterik ez zen. Guk geure burua preso politikotzat aldarrikatzen genuen, eta ohiko preso politikoen estatusa bindikatzen, kartzelako bizitza ere euren baldintza eta toki berdinetan eramateko. Ahal genituen presioak egin ondoren, eta Elizak ez zuela ezertan mugitu nahi ikusirik, azkenean, ekintza bortitz bat egitea erabaki genuen. Elizarekiko gure jarrera argi eta garbi geneukan hasieratik, Zamoran sartu eta hurrengo hilean Cirardari emandako paper batean azaltzen denez.

Zamorako apaizen mutina edo *tornadoa* deitu izan zitzaionak hots handia atera zuen kanpoan. «Nola zitekeen apaiz batzuek halako basakeria egitea, kartzelari su emanez, kapera barne?». Hori, noski, kontrakoen iritzi eskandalizatua zen, baina Euskal Herrian eta nazioartean ere, beste esangura bat hartu zuen. Berriak zabalkunde handia hartu zuen. Esan beharrik ez dago, kartzelan ezertan alferrik hasi aurretik, erraza ez zen prestalan luze baten ondoren, kanpoko

konexioak bermaturik genituela, ekintza bera eta ekintzaren motiboak aldarrikatzeko.

Mutina, laburturik, honela izan zen. Zazpi lagun ginen: Nikola Telleria, Jon Etxabe, Julen Kalzada, Pako Garcia Salve, Alberto Gabikagojeaskoa, Josu Naberan eta ni neu, Xabier Amuriza. Nikola gu baino askoz zaharragoa zen. Hirurogei urterantz zihoan. Ez genuen nahi hark ekintzan parte har zezan. Kostatu zitzaigun etsiaraztea, berak ere «azkeneraino» jo nahi baitzuen. Esan genion ez zela bera baztertzeagatik, baten bat libre uztea komeni zelako baizik, ondorengo ziegaldian konexio posibleren bat izan genezan. Argumentu horrek kobentzitu zuen, azkenean. Gure pabiloian (presondegi handi baten kartzela probintziala izana zen departamenduan), aipatu zazpi lagunok bakarrik geunden orduan. Bazen beste mallorkar adineko bat, delitu komunengatik, baina honegaz ez genuen inolako harreman politikorik. Elkarbizitzak eskatzen zuen giza harremana bakarrik.

Pentsatua genuen bezala, goiz batez izango zen ekintza, funtzionarioen errelebo aldakuntza baliatuz. Une horretan, elkar agurtu, behar ziren paperak sinatu eta abar, halako laxoaldi bat izaten zen, zihoazenen eta zetozenen arten. Aldakuntza bederatzietan izaten zen. Pako Garcia Salve zigorziegan zegoen. Lortu zuen zortzi eta erdietan dutxetara ekar zezaten, garbitzeko «premia urgenteren bat» zeukala eta. Dutxak beste lagunon aldean zeuden. Funtzionario batek eraman zuen, bueltan berak ekartzeko, gurekin nahasi gabe, eta han zegoen gizona, erdi biluzik, noiz hasiko zain, dutxatzeko plantak eginez. Halaxe izan ez balitz, Pako isolaturik geldituko zen bere ziegan, eta ezin izango zuen ekintzan parte hartu.

Jon Etxabe eta Alberto Gabika jantoki inguruan zeuden. Etxabek eman behar zuen hasierako kolpea, funtzionarioen mugida jantokitik behatzen baitzen ondoen. Julen Kalzada egongelan zegoen, hango telebista eta mahaiak apurtzeko zain. Josu Naberan eta ni goiko lotegian geunden, denok batera lo egiten baikenuen, sala handi batean. Ordu horretan,



lotegiko atea oraindik ixteko egon ohi zen. Hiru solairu ziren: dutxak eta patioa behekoan, jantokia, egongela, ping-pong gela eta komunak erdikoan, eta gorengoan lotegia, eritegia eta, beherantz, solairu artean, kapera.

Bakoitza bere tokian prest geundela, Etxabek jo zuen lehen kolpea. Aulki batekin mahai gainera igo eta puskatzen hasi zen, egundoko danbarradan. Haren inguruan zegoen Gabika ere berdin, ahal zuen guztia txikitzen. Besteok ere hasi ginen geure lanean. Dutxetan zegoen Pako, ezer janzteko asti gabe, praka motxetan hasi zen txikizioan, kristalak, ateak, iturriak eta txikigarri guztia puskatzen. Leiho txiki bat atera eta haregaz kristalak apurtzen zituen. Leihoak eta kristalak oso txikiak eta lodi-lodiak ziren, ehun dioptria bezalakoak, erdi transparenteak, beirate osoa sare bat bezalakoa zela. Pakok kolpeko bat apurtzen zuen, oinaztuaren abiaduran. Dutxetan apurtzekoak buruturik, erdiko solairura eta handik gorantz zetorren, zorua dena kristal xehez utzirik. Julen aulki bategaz telebista apurtu ezinik zebilen. Inork ez genuen itxaroten telebista pantaila hain puskaezina izan zitekeenik. Aulkiagaz ezinda, barra formako erradiadore bat askatu zuen, eta haregaz ere ezin. Desesperaturik zebilela, Gabikak esan zion: «Jaurti eik patiora!». Aparatua bizkarrean hartu eta, kanpora ematen zuen pasabidetik, solairu bat beherago zegoen patiora jaurti zuen. Puskatu zen, bai, ez edonola!

Naberanek eta nik lotegiko koltxoiei su eman behar genien. Ez geunden ziur nola erreko ziren, ezta erreko ziren ere. Su azkarra emateko beste gairik ez baitzen kartzelan, koltxoiek huts egiten bazuten, kanpotik ezingo zen ezer ikusi. Koltxoiak halako apar zakar eta zikin batekoak ziren. Eman genien su, eta bai hartu ere. Bo, sua ez hainbeste, baina zer zen hango kea! Beltz-beltza, gizen-gizena, petrolioa bezalakoa. Kostatu zitzaigun koltxoiak elkarren gainera botatzea, ito behar baikinen. Kea hasi zen leiho irekietatik txorro bortitzetan irteten (kearentzat barroteak ez dira etsai), eta horixe zen kartzela ondotik zihoan Duero ibaiaren beste aldetik ikusi eta

filmatu zutena. Efektua lortua zen, kartzela benetan sutan zegoela ematen baitzuen kanpotik. Lotegitik alde egin behar izan genuen, itoko ez baginen. Beherantzean, Naberanek kaperako atea apurtu zuen (itxita egoten zen eta guk ez genuen erabiltzen), barruan ahal zen txikizioa egiteko. Hori komunikabideetan oso maiseatua izan zen. «Nola liteke apaizek kapera ere erre eta apurtzea?». Gaitzespen hori aurreikusirik, gurutzea bereizteko erreflexua izan zuen, sakrilegio bat egiteko asmorik inondik ere ez genuela adieraztearren.

Artean, Etxabe eta Gabikaren inguruan gertatu zen funtzionarioak pentsatu zuen (eta benetan sinetsi) zoratu egin ginela. Harri eta zur, bere buruagatik beldur zen. Gabikak esan zion: «Geldi bazaudete, ez zaizue ezer egingo». Orduantxe lasaitu zen gizona ia infarto zoritik. Mallorkar preso komuna ere izuturik baztertu zen zoko batera. Telebista «tripak zeriozkiola» ikusi zuen Julen animatu zen arrakasta haregaz, eta egongela amorruz txikitu zuen. Bakoitzak pentsatua genuen lehen kolpea buruturik, gero ahal zuenak ahal zen guztia eta ahal zen azkarren puskatzea zen kontsigna. Elkar ez beste guztia, baina ez zegoen erraz elkar apartatzen. Ekintzatik kanpora gelditzea erabaki zen Nikola, bera ere sartzeko sutan zegoela genekusen, eta agindu behar izaten zitzaion: «Nikola! Zu, geldi!».

Hondamen guztia hamar minutu inguru izan zen, gehienez ere ordu laurden. Geu ere harriturik geunden hain denbora laburrean nola egin zitekeen halako triskantza. Ez ginen zoratu, baina bai zoraturik bezala ekin. Kartzelako zuzendari, zerbitzuburu, funtzionario eta behar ziren errefortzuak antolatu zirenerako (makilaz eta trepetxuz horniturik etorri ziren, agian armaz ere bai), egin beharrekoak eginak ziren, eta han baztertu ginen patioko horma kontrara, geldi-geldi, otzan-otzan. Hurrengo urratsa jakina zen. Berehala zigor-ziegetara. Bi, Jon Etxabe eta Pako Garcia Salve, probintzialean bertan entzerratu zituzten, eta beste laurok presondegiko zelularra edo *tuboa* zeritzonera. Guretzat, ekintzaren gogorrena orduantxe



hasten zen, gose-grebari ekitea erabakia baikenuen. Ekintzagatik auzipetu gintuzten, eta horregatik eta gose-grebagatik, hiru hilabeteko ziegaldia ezarri. Ekintza azaroaren erdi aldera izanik, negua zuloan igaro beharko genuen.

Nikola gugandik guztiz bereiz gelditu zen eta ezin zigun ezertan lagundu, baina ez zen alferrik izan hura aparte gelditzea. Abenduaren 20an Carrero Blancorena gertatu zen. Funtzionarioak lutuzko besokoz etortzen hasi ziren. Mila laguneko presondegi guztian, patioetako musikak isildu ziren. Seinale guztiak ziren zerbait handia, oso handia gertatu zela Espainian. Baina ez ziguten esan nahi. Zirikatzen genituen era guztietara, eta haiek zenbat eta sekretismo gehiago agertu, gure espektazioa eta antsietatea handiagoak ziren. Lau egun egin genituen ezer jakin ezinik, Gabon gaua heldu arte. Egun horretan, egun handiari zegokion salbuespen modura, zigortuei ere elkarrekin afaltzen uztea zen ohitura. Probintzialeko eritegian izango zen afaria, ohi baino hobea bera. Bagindoazen, eta berria emateko irrikaz zegoen Nikolak urrundik oihu: «Carrero!». Hura izan zen esplosioa! Nikolak berak ere nola jakin ahal izan zuen oso bitxia da. Hura libre, baina bakarrik zegoen. Hari ere ez zioten ezer esan nahi, baina susmatu zuen zerbait handia gertatu zela, egunkariak (*ABC, Ya, Diario de Zamora* eta *Marca*) guztiz mozturik baitzetozen. Zuloguneak gehiago beteguneak baino. Harrigarriena zen *Marca* ere (kirol egunkaria) dena leihoz josita zetorrela. «Zer arraio gertatu dok hemen?», txunditzen zen Nikola. Hartan, ari da Zamorako maila oso apaleko futbol partida bateko kronika txiki baten letra txikia irakurtzen, eta non aurkitzen duen: *«Y en el descanso se guardó un minuto de silencio por el asesinato de Carrero Blanco»*. Zentsura ahalguztiduna ere deskuidatzen zen batzuetan.

Esan bezala, kontatu berri den txikizioa amaiturik, gose-greba etorri zen jarraian. Eta hara non, hamahirugarren egunean, Madrilgo Carabanchelgo eritegira aldatu gintuzten. Han astebete eginik, berriz lekualdatzea iritsi zenean, beste

espetxe batzuetara bananduko gintuztela sinetsirik geunden, gainerako preso politikoen tratu eta sakabanatze berdinean. Madrilen, garaile eta euforiko sentitzen ginen, eta hantxe egin nituen arestiko bertsook, dema irabazi genuelako uste osoan. Kontaketan eta bertso hauetarako bereziki egin nuen doinuan ere islatzen dela esango nuke garaipen sentsazio hori.





## 1. Sutearen informazio grafikoa

Zamorako Konkordatu Kartzelako mutinak nazioarteko oihartzuna izan zezan, lekukotza grafikoa, telebistarena batik bat, ezinbestekotzat jotzen zen, zabalkunde berezi bat erantsiko ziolako. Horretarako arduraduna –jakitun jarriak geunden aurretiaz–, bere kamera eta guzti, Bartzelonatik trenez




Pedro Berrioategortua garaiko argazkian

helduko zela Bilboko Abando geltokira, *Triunfo* aldizkaria eskuan zuela ezaugarri. Halaxe gertatu zen.

Bezperatik bertaratu eta Zamoran latz ekin zion lanari arduradunak, euri zaparrada zakarrak jausten ziren arren. Espetxearen eta bere inguruaren bistak hartu zituen, bai hiriko harresitik bai Almarazko kaminoan zehar, makina motxilan genuela, kartzela aurretik pasatu eta harantzago joanik. Halabeharrez, une hartan espetxeko teilatuan gora zihoan ke-multzo beltz handia –sukaldeko tximiniatik irtena, ziur aski– grabatzeko aukera izan zuen. Hurrengo eguneko gertakizunaren informazioa girotzeko berebiziko irudia, bai horixe!

«Abenduak 6 gaur, berau duk eguna» esan, eta bere hamabi oinak Duero ibaian sartuak dituen zubi erromanikoa Seat 850 gorri batean zeharkatu ondoren, Carrascal kaminoa eskumara hartu eta gero traktore-bideetatik aurrera eginez, Duero bazterreko makalpean kokatua zegoen zoli kameraren begia, ibaiaren bestaldeko kartzelaren parez pare, aurrean zituela apaizen logelako leihoak.

Antolatua zegoen bezala, Almarazko kaminotik zetozela ikusi ahal ziren barruko apaiz batzuen familiakoak. Mutinak berehalako oihartzuna izango bazuen, espetxeko isilarazte zorrotzaren atzaparretatik kanporatu beharra zegoenez, etxekoren batzuk ere lekuko izatea beharrezkotzat ikusten zen badaezpada, grabaketak huts egitea ere gerta zitekeen eta.

Dena zihoan sinkronizatua, dena diseinatu bezala. Maribel (Gabikagojeaskoa), Marisol (Gabikagojeaskoa), Elisa (Kalzada) eta Rikardo (Gabikagojeaskoa) kartzelako ate nagusitik sartzeaz batera hasi zen gertatzen gertatu beharrekoa. Kartzela panoptikoaren kontrolean dei larriren bat jaso zen, antza, ate eta garitetako espetxezainak, guardia zibil berdeak, fusil eta guzti, ziztu bizian batetik bestera, nora ezean jarri zituena. Jakitun ematen zuten barruan gertatzen ari zen zerbait bortitzaz, baina itsumustuka zebiltzan argibiderik gabe, nora gabe, aldi berean, nahi ez zutela ere, gertakuntzari kolorazio ikaragarri aberasgarria ematen ziotela.



Guardia zibilek, ostera, korrikaren zergatia argi ez bazuten ere, jakina zitzaigun Duero ertzekooi, irrikaz begira geunden leihoetatik ageri baitzen. Apaizen logela berbera koltxoien bat -bateko sutegi bihurtua, hantxe bertan bistaratzen zitzaigula sugarren ikuskizun bikaina. Sutearen lama-argien dantza, gorantz indartsu zihoala, leihoetatik bistan. Sutan, beraz, barrutik kartzela.

Kartzela hura Konkordatuarena izanda ere, edo beharbada horixe izateagatik, zementu eta burdinazko eraikin erregaitza zenez, gure aldetik eginak eta ikusiak geneuzkan jadanik han egin eta ikusi ahal zirenak. Hortaz, lau haizeetara zabaltzeko prest zeuden nazioarteko prentsa agentziei gertatutakoaren berri eman beharrean geunden lehenik eta behin.

Hartutako irudiak, hala ere, gutxiegitzat jotzen zituen kameralari gazteak. Zerbait gehiagoren grina piztu zitzaion nonbait, eta lortu ere lortu egin zuen. Ez zegoenez kamera geldiarazteko erarik, autoan presaka eta indarka sarraraztekotan ari nintzela, nor nintzen estali beharrez jarria neraman ileordea adar batean zintzilikaturik lotu zen. Esan barik doa, gazte kameradunaren poza eta barreak zomorro hura arbolatik dilindan grabatu ahal izatean.

Bai eta, eginak egin, aurrera bere portaerarekin argazkilaria, hiriko harresipean zegoen auzo pobreko kalezuloetatik ihes egiteko esturan genbiltzala ere. Etxetxo haietako ate aurretan, burutik oinetaraino beltzez jantzitako zenbait atsotxo goizeko ikatz sua pizten ari ziren ke ugari atereaz, eta bera, filmagailua autuko leihoan ipiniz, guztia grabatzen jo eta su, tresna hura hala agerian eroateak niri ere barruan sua pizten zidala jakin arren. Informazio guztia pikutara botatzeko arrisku handia baitzegoen. Betiko poliziez gain, funtzionario ugari bizi zelako hiri kaskar hartan, eta, baita ere, apaiz euskaldunak bertara eraman zitzaizkienetik, *excombatiente* frankisten erakundea berrindarturik zebilelako, gordeta zuen pistola berriz aldean zeramanik ere bazela, adiskide tartean baieztatu zuenez.

Nolabait lortu genuen, azkenean, bigarren urratsa ere egitea. Eskuko telefonorik oraindik ez zegoenez, Zamora ertz batean hautatua geneukan kabinatik Madrilen itxaroten zegoenari igorri genion laburra bezain adierazgarria zen mezua. «Leihotik sua ikusi izan da».

Oraindik ere beste urrats nagusietako bat falta zitzaigun, alegia, mutinaren irudiak mundura zabaltzea. Egiteko horri lehentasuna eta hamarretakoari bizkarra emanez, Madrilerako bidean aurrera egiteari ekin genion. Eguerdi ostean, Pariserako lehen hegazkina hartu zuen Barajasen kameralari katalanak, mutina argazkietan zeramala. Ondorioz, irudi haiekin Zamoran gertatutakoaren berri gau hartan bertan eman zuen Frantziako telebistak. Beraz, helburua bete-betean lortua zegoen mutinaren grabazioa hedabideetako kate nagusian eskegi eta gero.

Ikusten zitzaion, bai, kameradun gazte hari lanerako zeukan karra, jarduteko zeukan lehia, mutinkide bilakatu arterainokoa, txarrerako zein onerako. Ordainetan, ekintza hark eman zion atseginaz gain, kameran zeraman zeluloide grabatua suertatzen zitzaionez, saiatuko zen, seguru, etekinak ateratzen bere buruari laguntzeko eta bere egin zuen mutinari ere bai, bide batez. Handik denbora batera, bere gestioaren etekin bat, bat behintzat, ezagutzeko aukera izan nuen. Idahotik etorria zen artzain batek esan zidan beraiek han ikusi izan zutela Zamorako kartzela, ke handiak botaz, erretzen.

## 2. Zuloa kanpotik

*Osaba Joxe*ren bidez Imanol izan zen gehien lagundu zuena, erreminta eta abar. Azken alderantz, Paskualek eta Zarrak ere bai, batez ere ihesaren osterakoa prestatzen, nora, zer, zelan.

Etxea alokatua genuen Zamoran bertan. Manolita Romerok, Teo Uriarteren amak, eman zuen izena eta firma alokairuan. Koltxoiak eta mantak ere erosiak genituen. Pilaricaren zubia zetorrela eta, euskal ehiztariak erruz zebiltzanez handik, gu geu ere ehiztari. Salamancan, berriz, aurreratuak zeuden babeslekuaren gauzak.



Espetxeko patioaren atzean mendi-tontortxo bat dago, nondik kartzelaren patioa ondo eta barruak ere hainbestean ikusten diren, batez ere gauez. Bertaratzeko hartzen da Alcañicez eta Portugalgo Braganzara doan errepidea. Autoa kamino ertzean utzi eta basorik baso eginez heltzen da tontor horretara. Egunez egonak gara bertan, turista erara, bokata eta zahatoarekin. Gauez ere bai, funtzionarioen orduak eta nondik norakoak ezagutzeko. Bai eta guardienak ere.

Tontor horretatik aztertu ahal izan zen baita zuloaren irteerako ingurua ere, hala nola, lursailaren zelakoa, zelaiko landareak, bere luzera, babesteko hormak eta kaminorako irteera. Alferrik.

## 3. Erorketaren ostean

Zuloaren erorketarena prentsak noiz eta nola eman zuen aztertzea interesgarria izan daiteke. Hori alde batera utziz, guk geuk, familien bitartez, zerbaiten susmoa bagenuen arren, erorketa gertatu izanak sekulako ardura eta tristura eragin zigun. Ziurtatu irratiek egin ziguten.

Erori eta lehenengo bisita Julenek izan zuen. *«Aquí nos dicen que algunos de aquí han hecho un agujero para marcharse, yo no sé nada»*, esan zien berak.

Zamorako etxea jasotzera egindako joan-etorria ere negargarria gertatu zitzaigun; Pilaricaren zubian joan ginen hain suertez ere, eta BI eta SS matrikulaz josiak kamino guztiak. Doi-doi iheserako pentsatuta genuen giroa.

## 4. *Osaba Joxe*

Imanol Oruemazaga eta bere herri taldeari esker sartu ahal izan zen espetxean *Osaba Joxe*. Imanolekin, beharbada. Inplikatu zen jende bat eta bere ingurua, orduko eta oraingo beren jarrera-pentsaera, eta abar.

Carrascalera zihoan kaminoan kartzela parean jarri eta dei eta dei ekiten genion, gaueko hamarretatik aurrera, harik eta barruko erantzuna jaso arte. Gure aparailuen bidez beste irrati-seinale asko entzuten genituen, batzuk indartsuak oso, eta hizkuntza askotan. Ez dakigu norbaitek entzuten zigun guri; badaezpada, euskara hutsean egiten genuen beti. Susmoa bagenuen, behintzat.

Susmotan gu, eta kartzelariek ere zerbait usaindu bide zuten. Horrela, 1970. urte aldera, kartzelako garita gainetan foku indartsuagoak jarri zituzten, beraien argi kolpeekin gure autoa, barrutik ere, argi-argi jarri ahal izaterainokoak. Kontuz ibili beharra zegoen. Laguntzaileetako bat, behin, mendian gora iheska joan zen, beldurturik.

Burgosko juizioaren egunetan, zuloa gelditzeko deia ere *Osaba Joxek* eman zien, *Zarra* lagun. Egun horretan gertatua: Zamora baino lehentxeago guardia zibilen kontrola. Zertan handik, eta asteburu pasan. Gehiagoko barik aurrera. Bueltan, apustu bion artean; bai ala ez kontrola bertan. Bada, bai. Eta lehen ez bezala, oraingoan dokumentazioa eskatu. Eta gu, beti bezala, Burgostik barik Leondik etxerantz, *Osaba Joxe* kamino ertzeko harripe batean ostendu eta gero.

*Osaba Joxe*ren bitartez harremana izan zuen gure zamorarrekin Paristik etorritako apaiz batek ere. Aubry izena zuen eta bere jaioterria Aturritik nahiko hurbil zegoela zioen. Gaztetxotan erresistentzian nazien kontra borrokatua, *Concilium* aldizkari post-kontziliarrean kolaboratzen zuen. Oporretan Hego Amerikako talde indigena batekin elkartzen zen. Azken berriek diote haiengana behin betirako joana zela.



Gero berarekin eraman bazuen ere, zuloa egitea ezinezkoa izango zen *Osaba Joxe* gabe, batez ere azken ihesa. Zuloaren martxa eta kanpoko prestaketak bateratuak eraman ahal izan ziren hari esker.

## 5. Zamorako espetxearen eragina eta jendearen erantzuna: diru laguntza

Ezarritako zigor hain larriek –eta gose-grebaren zergatiak ezagutuz gero– ernegazioa ernarazi zuten, eta grebaren beraren zergatiak, ostera, elkartasuna sortu zuen herritar askorengan. Ondorio moduan, herri bakar bateko behe mailako langileen artean –ekarpen txiki baina ugariei esker– oso erraz batu zen, lehenengotan behintzat, Zamorako espetxera bidalitako paketeak ordaintzeko adina.

Laguntzeko borondate hori zabalduz joan zenez Bizkaian, batez ere eskualde euskaldunetan, Jabier Ozerinjauregi izan zen diruzaintzaren arduraduna kartzela horrek iraun zuen denboraldi guztian. Gauza da hortik eta hemendik behar izan zen dirutza ere ez zela izan txantxetakoa. Despentsa mantendu zen bezala hornituta mantentzeak bere kostua zuen. Eta zer esan gainerako kostuez, batez ere abokatuarenaz.

Kanpoko laguntza sail horretan, bihotzen barne-muinetan gordetzen dugu hainbat emakumek gure alde egin zuen lan eskerga eta erakutsi zigun xamurtasuna.

## NAZIOARTEKO LAGUNTZA

Juan Mari Arregi

BOST APAIZ EUSKALDUNEK BILBOKO GOTZAINDEGIAN egin zuten gose-grebak eta atxilotu ondoren bostak Zamorako Konkordatu Kartzelan sartu izanak, baita bertan egin zuten mutinak eta ihes-ahaleginak ere, oihartzun handia izan zuten Europan. Iparraldetik, non ETAri laguntza emateagatik justizia militarrak jazarritako beste apaiz lagun batzuk errefuxiaturik zeuden, informazio-jario iraunkorra sortu zen nazioarteko prentsaren bidez eta, batez ere, 1960-70 urte haietan sorturiko apaiz ihardukitzaileen nazioarteko erakundeen bidez. Zornotzatik, non Zamorako kartzelan preso zeudenen berri etengabe hartzen zen, informazioa Donibane Lohizunera bideratzen zen gehienbat. Herri horretan J. M. Arregi zegoen errefuxiaturik, eta gainerako apaiz lagun erbesteratuak, berriz, Parisen, Bretainian edo Bruselan.

Lapurdiko herri horretatik, informazioa, nazioarteko prentsari ez ezik, Europako zenbait talderi ere helarazten zitzaien. Informazio jarioak urteetan iraun zuen, Italiako oinarriko kristau komunitate batzuekin, bereziki. Orduan entzutetsua zen kristau komunitate batek, Isolottokoak, Eliza Katolikoaren hierarkiak zokoratua bera, hileroko buletina argitaratzen zuen, eta hartan beti ematen zen Zamorako kartzelan gertatzen zenaren berri. Tunel luzea eginez apaizek

egin zuten ihes-ahalegina bera ere buletin horretako albisteen artean agertu zen. Eta geroago, informazio haiek beste batzuekin osatuz, liburua idatzi zen Konkordatu Kartzelari buruz.

Hala ere, 1969-70ean Amsterdamen (Herbehereak) eta Coiren (Suitza) egin ziren Europako apaiz ihardukitzaileen bi biltzarren bidez zabaldu ziren gehien hala *euskal arazoaren* kasua nola Zamorako Konkordatu Kartzelarena. Biltzar biotan, zeinetan Europa osoko ehun apaizek baino gehiagok parte hartu zuten, euren artean zenbait Euskal Herrikok (Josu Barandika, Zamalloa eta J. M. Arregi, izan ziren euskal ordezkaritzaren aldetik, eta Arbeloa, nafarra, ordezkaritza espainolaren aldetik, zeina kritiko agertu zen euskaldunekin), mozio bana landu ziren. Erabakietan biltzar biak Euskal Herriaren alde eta euskal apaiz jazarrien, Zamoran kartzelatuen eta erbesteratuen alde agertu ziren. Amsterdamgo biltzarrean Zamorako kartzelatik irten berri zen euskal frantziskotar bat ere izan zen, J. M. Zulaika, zeinak txalo zaparrada handia jaso zuen, jazarrita, kartzelan edo erbestean zeuden guztiengana hedatzeko asmoz emana.

## 1. Madrildik, Euskal Herriko berriak edo

Zamorako kartzelakoen ihes-ahalegina gauzatzear zegoen aldi berean, Euskal Herriaren zati bat salbuespen-egoeran zegoen, horrek askatasunentzat eta giza eskubideentzat zekarren guztiarekin frankismoa bezalako erregimen baten barruan. Informazio biderik ezaren aurrean eta klandestinitate minean, *Euskal Herriko berriak salbuespen-egoeran* izeneko buletina sortu zen, zeina Madrildik Euskal Herrira ez ezik, Espainiar Estatuko gainerako herrialdeetara ere bidaltzea lortu zen. Xabier Sanchez Erauskin, Madrilen bizi zena, eta J. M. Arregi, erbesteraturik egon ondoren aldi batez Bartzelona eta Madril artean bizi izan zena, izan ziren ekimen horren buru.



Madrilen bizi ziren zenbait lagunen lankidetza desinteresatu eta arriskugarriari esker, astero argitaratu zen, kopiagailuz, buletin hura. Polizia eta Guardia Zibila buletinaren atzetik gogotsu ibili eta hari buruzko galdeketa asko egin bazuten ere, ez zuten sekula harrapatu. Jazarle handienetako bat Hidalgo kapitan famatua izan zen, Busturialdea eta Durangaldea kontrolatzen zituen Guardia Zibilaren komandantea, hain zuzen. Isilpeko buletin informatiboa Bizkaiko eskualderen batean argitaratzen zela konbentziturik zegoen, bere atzaparretan jausten zen guztiari buletin horri buruzko itaunketa egiten baitzion.

Bada, isilpeko buletinaren ohiko kapituluetako bat euskal preso politikoen egoera zen. Zamorako kartzelan zeudenei buruzko informazioa, berriz, oso iraunkorra zen, Zornotzaren (Periko Berrioategortua) eta Madrilen arteko (J. M. Arregi) informazioa egunero gauzatzen zelako. Hain zen zabala informazio hori, non 16. zenbakiak, 1975eko uztailaren 31koak, azala eta sei orrialde eman zizkien Zamorako kartzelako egoerari eta haren historiari. Azalak, kartzelako argazki eta barroteen muntaia batekin egina eta bulegoko fotokopiagailuz kopiatua bera, orduan Zamoran zeuden sei apaizen argazkiak zekartzan (Julen Kalzada, Josu Naberan, Alberto Gabikagojeaskoa, Xabier Amuriza, Jon Etxabe eta Francisco Garcia Salve). Zenbakiaren izenburua *Elizaren eta Estatuaren gatibu* zen. Garai horretan, Nikola Telleria jada ez zegoen han: gaixorik egonik, Carabanchelgo kartzela ospitalera eraman zuten lehenbizi, eta handik ere irtenda zegoen, etxean, larriki gaixorik. Handik gutxira hilko zen.

## 2. Nazioarteko prentsa ere erne

Zamorako kartzelatiko ihesa eta haren beste gorabehera guztiak kanpotik behar bezain ongi prestaturik zeuden. Hala ihesa bera eta iheslarien babesa, nola guztiaren oihartzuna na-

zioartean zabaltzea ekintza arrakastatsuak izateko moduan, hain zuzen. Horretarako, Zornotza-Madril ardatzak, lehenean Periko Berrioategortua eta bestean J. M. Arregi buru zirela, topera funtzionatu zuen. Madrilen, diskreziorik handienaz, tentuz aukeraturiko Europako egunkari garrantzitsuenetako, nazioarteko zenbait agentziatako eta, bereziki, Europako telebistetako kazetari eta korrespontsal talde bat erne ipini zuten, azkenean gauzatu ezin izan zen ihes posiblearen berri emateko prest egon zitezen. Ihes egitea lortu izan balitz, informazio eta telebista dispositiboak dudarik gabe ongi funtzionatuko zukeen.

## 3. Abokatu eta lagun moduan aldizkako bisitak Zamoran

Zamoran espetxeraturik zeudenei kanpotik eman zitzaien laguntzak aipatzen hasiz gero, garrantzizko atala osa lezake presoen abokatua eta aldi berean laguna zen Luis Maria Danboreneak. Hark tarteka-tarteka apaizei egiten zizkien bisitetako bidaietan, normalean J. M. Arregik lagundu izan zion aldi luze batez. Ez ostera bisitetan euretan.

Bisitak kontu garrantzitsua ziren, orduan Zornotzan bizi zen aipatu abokatuaren bidez kanpoaren eta barruaren artean zuzeneko harremanak gauzatzen zirelako. Bisitetan, abokatuak zortzi edo hamar ordu ematen zituen. Ahoz ematen zien informazioaz gain, abokatua moldatzen zen presoei debekaturik zituzten zenbait janari eta edari ere kapa antzeko beroki batean ezkutaturik pasatzeko. Baina dena ez zen janari materiala; orduan isilpean zirkulatzen zuen dokumentazio klandestinoa ere pasatzen zien, talde eta joera guztietako idazkiak, aurretik artaz bildu eta hautatu ondoren.





Jon Etxabe

## Zerk eraman ninduen kartzelara

Seminarioko apaiz-mistikaz blai atera nintzen seminariotik, Berri Ona eman behar nion herriari. Diktadura frankistako errepresio-urte latzak ziren 1950eko hamarkadakoak. Herriko apaiz, indartuz joan zen herriaren zerbitzari bizipena, baita apaiz gisa herriarekin genuen erantzukizunaren kontzientzia ere. Garai hartako apaizen salaketa-ekimen ugaritan hartu nuen parte. Eibarren, JOC eta HOAC langile gazte eta helduen kristau erakundeetako kontseilari izan nintzen. Aldi berean indartzen joan zen haurtzaroan zein gaztetan etxeko giroan sortutako abertzaletasun sentipena. 1960ko hamarkadan ginen jada.

Ez naiz ausarta, baina erronkei aurre egiten dieena bai; ez naute kikiltzen erantzukizunek.

ETAko militante batzuk autoz eramatea proposatu zidaten. Banekien Elizaren dotrina ofizialari kasu eginez, kontraesan sekulakoan sartzen nintzela. Baina herriaren alde egiten zuenari ezin zitzaiola laguntasunik ukatu pentsatu nuen, Jaungoikoak ere ezin zuela horrelakorik ukatu. Ez nintzen labirinto teorikoetan sartu, hori baita gehienetan bidea galtzeko aitzakiarik erosoena. Baiezkoa eman nuen.



Jon Etxabe garaiko argazkian

Lehen pausoaren ondoren, konpromiso gehiago etorri zen, denak liberatuei laguntasuna eskaintzekoak. Nire autoa erori zen eta, Poliziaren beldur, ihes egin nuen. 1968ko uztailaren 21a zen.

Liberatzea eskaini zidaten. Ez zen erabaki erraza izan. Jabetzen nintzen zer-nolako pausoa zen: herriaren alde egiteko jarduera arras ezberdin bat, talde armatu batean aritzea, alegia. Ez nuen kontzientzia arazorik izan, kontraesan teoriko asko nuen arren dotrina ofizialarekin. Propaganda ardura



eman zidaten, arma eskatu nuen nire ardurapeko erantzukizunak defendatzeko bitartekorik eraginkorrena zelako.

Hilabete batzuetara harrapatu eta kartzelan sartu ninduten, Zamorako Konkordatu Kartzelan, 1969ko maiatzaren 9an.

Burgosko epaiketara atera ninduten Zamoratik, 1970eko azaroaren 20an.

Heldu zen behingoz sumarioa, urte eta erdiko itxaronaldi urduriaren ondoren. Izugarrizko totxoa: garai hartako fotokopia marroi horixka, zikin itxurakoa, irakur zaila. Egindako, egin asmo edo egin omen guztiak zetozen bertan. Eskurik esku ibili zen. Gabriel Garcia Marquezen eleberria bezain gustura agian ez, baina interes handiagoz irakurri zuten denek.

Julen eta ni apaiz izateagatik epaiketa ateak itxita egingo zuten mehatxuak biziki kezkatzen gintuen. Presio asko egin zen eta, azkenik, onartu zuten epaiketa irekia.

Jadanik Burgosen, gaixotegian sartu gintuzten bi apaizok, besteengandik banatuta; diskriminazioak zerraien han ere. Epaile instruktorearekin gauzatu zen apaizon jarrera. Leun eta errespetuz hasi zen «*padre*» gora eta «*padre*» behera. Inolako kasurik ez geniola egiten ikusirik, mutur-oker bidali gintuen *«llévense a estos dos presos preventivos»* ezin zitalagoz. Garaipen sentimendu hura gordetzen dut oraindik.

Epaiketa politizatzea erabaki zen. Nire militantziak apaizgoarekin sortzen zituen kontraesan guztiak jarri nahi nituen agerian nik, nolabaiteko hausnarketa bat probokatu. Apaiz jantzita nahi nuen azaldu, gainera, nolabait hori guztia eszenifikatzeko. Zerbitzuburuak ez zidan kartzelatik apaiz jantzita ateratzen utzi nahi; besterik ezinean lepoko txatal zuria kenarazi zidan. Poltsikoan gorde eta autoan jarri nuen berriz.

Epai-gelan, besteak ez bezala lotuta jarri gintuzten, eskuak aurrean lotuta alegia, atzean ordez. Apaizekiko diskriminazioa berriro.

Esaldi motzeko oso testigantza laburra, ia ezer agertzen ez duena dirudi epaiketako nire deklarazioak. Baina hala be-

har zuen, zerbait azaltzen hasi orduko moztu egiten baitzigun hitza epaile buruak. Zuzen, motz eta ahal bazen hitz bakarrean behar zuen erantzunak. Abokatuaren galderak zuen han garrantzi ia osoa, epaituok ez baikeneukan ia ezer esateko aukerarik. Esan genuena baino, gure jarrera izan zen erabakigarriagoa.

Ez dakit nik nire helburua lortu nuen, epailea –Franco eta frankismoa– epaitzea bai lortu genuen. Nolanahi, herria izan zen epaiketa irauli zuena, salatzaile bihurtu zen, epaitegi bilakatuz kalea. Euskal Herri osoa altxatu zen, mundu ia osoa ere bai, gizarte osoa. Herria izan zen diktadura kondenatu zuen epailea, gu tresna xume bat besterik ez ginen izan.

Zamoran berriro, 1971ko urtarrila edo izanen zen, bizi-bizi dut ikasgelako irudia: Julen (Kalzada) eta biok epaiketaren berri zehatza ematen, denak adi-adi, begiak dir-dir, irribarretsu, epaiketako eta kaleko berriak jasoz, hitzerdika bisitetan entzundakoa besterik ez baitzekiten, hain zen zorrotza eta basatia Zamorako zentsura.

Julen eta biok izan ginen azken apaiz preso politikoak Zamoratik ateratzen. Apaiz preso sozial bat geratu zen, komenturako itxaropenarekin. Komentura eraman ninduten, eta amnistiarekin bueltatu nintzen herrira. 1977ko apirilaren 6an heldu zen aske uzten ninduela zioen epailearen telegrama.

## In-Komunikazioa

Legeak ofizialduta edo praktikak legeztatuta, baina botereak beti ezarri die sakabanaketa, urrutiratzea eta isolamendua preso politikoei. Hala egin zuten apaizokin ere. Urruti nahi gintuen bai Elizak, bai Frankok. Euskal Herritik baino gehiago, herritarrengandik urruti, batez ere. Gaztela zuloan, Espainia hartako basamortuaren erdian, kilometroz adina errepide kaskarrez urruti eta helzail jarri zuten Konkordatu Kartzela.



Kartzelak, maiuskulaz, badaki giza harremanak direla presoaren arnasa, are gehiago preso politiko batena. Apaizona ere bai, nola ez. Horregatik, urrutiratze geografikoaz gain, giza isolamendua ere ezarri ziguten, kanpokoekiko harremanak –bisitak, gutunak, komunikabideak...– muturreraino zailduz, ahal zen neurrian ezinduz.

Nahitaezkoa zitzaigun langa hori gainditzea. Hil edo bizikoa.

*Bisitak*, astean bat, ordu erdikoa, bi sare-hormaz banaturik familiarengandik: bi sareen erdian kartzelaria. Senide zuzenak soilik etor zitezkeen, guraso eta anai-arrebak soilik; euskara erabat debekatuta, ez zen posible isilpeko ezer esatea, are gutxiago politikaz, hitz solteetan ez bazen. Bi ama gutxienez ia hitzik egin gabe itzuli ohi ziren etxera gazteleraz aritzea oso zaila zitzaielako. Senidetasun asmatuak, esanahi bikoitzak, zeharkakoak –sarri geratzen ginen «halakok zer esan nahi ote zuen»–, argota, hitz erdikakoa, euskarazko hitz bakarra botatzea, keinuak, aurpegierak... kodigo berezi propio bat osatuz joan ginen. Kriptograma anitz esperimentatu genuen bisitetan, azkenez ezer gutxi argitzeko gehienetan.

Bi *egunkari* genituen, dena eskuina zen garaian, eskuinekoenak biak: paper adina zulo gehienetan, zentsurak moztuta nondik heldu ere ez zutela. Hitz solteren baten bila ibili ohi ginen, notiziaren baten hari muturra non aurkituko. Sarri bueltatzen genituen egunkariok protesta gisa, aldi luze batean egon ginen egunero egunkariok bueltatzen: protesta antzuak. Informazio bide berriak asmatu eta sortzea beste irtenbiderik ez genuen.

*Gutun* bakarra idatzi genezakeen astean, orri bakarrekoa, senide zuzenei soilik; senide zuzenek soilik idatz ziezaguketen. Azkenengo marratik behera hitz erdi bat, eta itzuli egingo ziguten gutuna. Ez zuten euskarazko hitz bakar bat ere barkatzen, agian *zorionak* urtebetetzeetan. Ezinezkoa zen gogoko genuen ezer idaztea, gai inozoenaz ere, huskeriez soilik ahal zen. Barrukoa zein kanpokoa dena zen tabua. Denok ika-

si genuen, azkenez, pasa zitekeena soilik idazten; halaz ere, lerro ezabatuak ugariak ziren. Horrez gain, auskalo zenbat begik irakurtzen zituzten gure gutunak, hainbat eskutatik pasatzen baitziren inolako kontrolik gabe, zabalduta: zuzendaria, zuzendariordea, maisua, apaiza, zerbitzuburuak eta, azkenik, funtzionarioak. Erabatekoa zen intimitatearen urraketa.

*Seilu*peko trikimailuak ez zuen asko iraun: Josuri 20 egunez komunikazio oro eten zioten berak idatzi zuelako, eta Xabierri osaba batekin harremanak debekatu hark zigilupean idatzi omen ziolako.

*Kodearen* azpibideak, aldiz, bukaeraraino iraun zuen. Zaila zen eta ez zuen askotarako ematen, baina bai gutxieneko mezu batzuk bidaltzeko; emozio puska sartzen zion, gainera, gutunari. Erabilia zen ni heldu aurretik, Mikelek eman zidan amarruaren berri: halakogarren lerroko halakogarren hitzak ziren kontuan hartzekoak. Ez zen erraza gutun itxuraz normala azpi esaldi ezkutuekin osatzea, baina funtzionatzen zuen.

Ez zen irratirik kartzelan. Nahiko gerora jarri ziguten telebista, ordu oso mugatuetan. Eguerdiko eta iluntzeko albistegiak bagenituen, behintzat, eta nolabaiteko leihotxoa zen kanporantz.

Abokatuekin ziren testigurik gabeko harreman bakarrak. Baina ia gehienok epaituak geundenez edo berriak isunengatik zetozenez, ez zigun askorik balio izan bide horrek.

Hori zen panorama. Baina pausoka-pausoka ehunduz joan zen komunikazio sare paralelo bat. Azpibideak bilatzen eta ehuntzen joan ginen. Bizkaitik etorri zitzaizkigun, batez ere, kanpoarekiko loturari eusten lagundu ziguten harremanok.

*Osaba*: walkie-talkie aparailuari deitzen genion horrela. Pasatu egin ziguten. Patioan gordetzen genuen, lurpean; hiru arazo genituen: zorua inguruaren antzera uztea, funtzionarioa eta preso arruntak zaintzea. Une gutxi eta laburrez baliatu behar ginen. Makina bat aldiz bidali genuen kartzelaria penalera zerbaiten bila.



Noizbehinka, gutunez edo bisitaren bidez etortzen zitzaigun notizia: osabaren bisita izanen duzu. Urduritasun egunak izaten ziren bisitaren aurrekoak, emozio handiko gauaren atariko. Josu komuneko leihatilan –bera izan ohi zen komunikatzailea– eta gu denok logela luze zabalean, hitz egiteko baino urduriago, jakin-minez, baina hitz egin beharrean, normaltasun itxura emateko. Gehienetan ez bazen, sarri denok edo asko hurreratzen ginen kanpokoekin agur bat trukatzeko. Saioa bukatu ondoren, Josuren berriematea zetorren. Ordu bereziak ziren haiek.

Osabarekin hitzordua genuen zuloa harrapatu ziguten egunean, 1971ko urriaren 13an. Araketa zorrotz baten beldur, sukalde gaineko teilatura bota genuen, abilezia gutxirekin edo urduritasun gehiegiz; nahiko agerian gelditu zitzaigun eta harrapatu egin zuten. Ez ziguten aipamenik ere egin hari buruz.

Bukaera polita izan zuen, baina. Zigorraldia bukatu ondoren, etxekoei buelta ziezaiotela eskatu genion kartzelari. Epailearen eskumena omen, berari egin zitzaion ondoren eskabidea: erosketaren ordainagiria eskatu zuen. Ez genuen, noski! Ez dakit zer erantzun mota eman genion, epaitegiko sotoren batean ustelduko zelako ziurtasunez, baina hara non itzuli ziguten eta familiak eraman ahal izan zuen gure *osaba*!

Irratia, azken aldian izan genuen. Azpibidetik etorria hura ere. Irrati txiki bat zen, belarritako batez entzuten genuena. Ondo zaindu behar zen altxorra. Gehienetan tripapean, galtzontziloa eusle, erabili ohi genuen, txandakatuz dutxara edo jolasera gindoazenean.

Gauez soilik erabiltzen genuen. Radio Paris entzuteko batez ere, gaueko gaztelaniazko irratsaioa. Goizean, gosariaren ondoren, biltzen ginen eta entzundakoaren partea ematen zitzaien denei. Hura bai albistegia.

Ping-pong eremuan lau zigor-ziega egin zituztenean, Josuk edukitzen zuen irratitxoa zigorraldietan. Pako eta bera jarraian egonik, patiora ateratzean –bakarka beti– ahal zuten

leihotik leihora irratia eskuz pasatu, kanpotik begiratuta ezinezkoa bazirudien ere.

Latak, esne kondentsatuaren tutuak, eta abar gure esku egon ohi ziren lehen aldian, despentsa zen gelan. Gerora erabat kontrolatu zuten despentsa, zaildu zitzaizkigun gauzak, baina hortzetako eskuilaren kirtenekin giltzak egiten zituen sarrailari abila genuen, eta nahiz presaka eta argi egin beharreko operazioa izan, lortzen genuen bidaliak eskuratzea. Kanpoarekiko harreman zuzena eta eraginkorra izan zitzaigun, azken egunera arte. Sekulako zirrara eta ikuskizuna izaten genuen konboi egunetan, eskuratzeko maniobrengatik lehenengo eta zetozen mezuengatik gero.

Limoia omen kartzeletan asko erabilitako katramila. Bide ezagunegitzat edo, gutxi erabili genuen. Baina izan genuen istorio polit bat: behin heldu zitzaigun liburu bat, halako kartzelatik zetorrela hitzezko mezuarekin. Akziozko eleberri arrunt bat zen, denok irakurri genuen, kartzela hartakoen goraintzi-modu bat zela ustez. Gero luzera, erantzuna edo iritzia



Carmelo Zamalloa garaiko argazkian



eskatuz mezua heldu zitzaigunean, jabetu ginen azpi-edukia zetorrela, limoi-urez idatzita. Argitu genuen; isilpeko beste liburu bat gordetzeko erabili genituen azalak.

Aske zihoazenak izaten ziren postari nagusiak kanporako; hori zen bide errazena, ia aukera bakarra. Lehen aldian, jende gehiago egon zenez, paper askoz gehiago atera genuen; gutxi eta kondena luzekoak geratu ginenean, agortu zitzaigun bidea. Jostun finak bihurtu ziren batzuk. 1970eko ekainean Julen zigor-ziegan zegoen, kanpora zihoan Karmelo Zamalloari berokia askatu eta haren paper bat aurkitu ziotelako. Estualdi bat pasatu genuen behin: atera behar zena luzaro eduki zuten pasilloko ziegetako batean: Zamorara bidali zuten berokia, sastre batek askatu eta miatu zezan. Oinetakoak ere ezkutaleku erosoak izan ziren, ez ziguten ezustekorik eman.

Argazki kamera bat ere pasatu ziguten. Kartzelako argazkiak izan zitezkeen agitaziorako baliabide eragilea. Aparailu txiki bat zen, flash bonbilla urdinxka txiki batzuk jarri behar zitzaizkion bakoitzean. Guretatik inork ez genekien ezer argazkigintzari buruz, baina atera genituen argazkiok, flasharen bristadak salatuko gintuen kezkaz. Onik joan zen fase hori. Norbait kanpora joatekoa zen eta harekin bidali behar genuen erroilua: elkar loturiko bi ontzitxok osatzen zuten. Baina bietako zein aldetan zegoen pelikula? Bat bakarra bidali ahal baikenuen. Egin genuen aukera, zenbait kalkuluren ondoren. Norbaitek izan zuen ideia: tapa altxa zion, zirrikitu ñimiño bat besterik ez, baina nahikoa erroilua osoki edo ia dena belatzeko. Atera, atera genuen kanpora, baina ez zegoen ezer erabilgarririk.

Horiek izan ziren kanpoarekiko zubiak, horietatik ibili ziren harantz-honantz gure ametsak, bizipozak, ezinak eta ahalak, biziraupenerako funtsezko baliabideak guztiak ere.

## JULEN KALZADA, HERRI GAZTEDITIK ZAMORARA

Xabier Amuriza eta Josu Naberan

BUSTURIAN JAIO ZEN JULEN, 1935EKO UZTAILAREN 18an, Etxebarriatze baserrian. Aita galduaren sentimenduarekin batera –aita Errepublika denboran Busturiko zinegotzia izan zen PNVtik. Frankistek, Busturira sartu zirenean, 1937ko apirileko domeka batean Axpeko Elizako meza nagusia amaitu zenean, elizpean itxaron, bertako bi mutil gaztek esan frankistei nor zen eta eraman zuten Bilboko kartzelara. Urte bereko abuztuaren bostean fusilatu zuten, Derioko hilerrian eta bertan egon zen ehortzita, alargunak Busturiara ekarri arte, euskal sentimendua ere betirako itsatsirik geratu zitzaion. Hauxe dugu Julen jatorra, itxurazko *enfant terrible* erasokorraren atzean ezkutatzen den gizon samurra. Kontu goxoak patxadaz eta lasai barre eginez kontatzea gustatzen zaiona. Laster konturatuko gara, ideiak azaltzean xehetasun gutxi ematen badu ere, ez dela horrela gertatzen bestelako gauzak kontatzean. Adibidez, xehetasun mordoa emango dizu umetako eta lagunarteko pasadizoak adieraztean zein bere zaletasunak agertzean.

**Herri Gaztediren hasieran egon al zinen zu?**

Bai, hasiera-hasieratik izan nintzen.

**Nola sortu zen mugimendua?**

Gazteekin lan egin beharra ikusirik, JARC eta herri-mugimenduak pixka bat ezagutzera joan ginen Ipar Euskadira eta Frantziara.

**JARC?**

Bai. Erdaraz, Juventud Agraria Rural Católica uste dut, ez nago ziur. Euskaraz, Herri Gaztedi.

**Ba al zen kontzientzia politikorik mugimendu horren hastapenetan?**

Hasieran eliz mugimendu aurrelari gisa planteatzen zen gehiago. 1960an geunden eta jende asko zegoen prest, gazte jendea batez ere, hierarkiatik landa lan sortzailea egiteko. Gu, herri txikietako apaizak, solte samar genbiltzan eliz hierarkiatik bide berrien bila, gogoz. Ander Manterola-eta biltzen ginen Durangaldean. Gero Iparraldeko, Nafarroako eta Gipuzkoakoekin ere biltzen hasi ginen, eta horrela hedatu zen mugimendua Euskal Herri osora. Oinarrizkotzat hartzen genituen euskara eta euskal kultura. Eta herri planteamendua egiterakoan, bazen halako askapen-teologia bezalako bat, nahiz eta hitz horiek erabili ez. Baina, batez ere, gure ekarpena *ekintza* planteatzean zetzan, metodologian.

**Ez zen ondo ikusia izango hori guztia goitik.**

Gehituz joan ziren tirabirak hierarkiarekin. Haiek euren kontrolpean nahi gintuzten...

**Susmagarri zineten, beraz. *Kutsua* sumatuko zizueten agian.**

Baliteke, baina bestela ere ez zuten gogoko ezertariko ezer egitea. Espabilatu samar batek zioen bezala: *«Aquí, por no hacer nada, no te hacen nada»*.

**Gatozen orduan ETAren garaira. Noiz izan zenuen lehen aldiz ETAren berri?**

ETAren lehen notizia hormetatik jaso nuen. Hantxe ikusi nuen pintaturik ETAren izena, Orozkoko Muruetan abade nintzela.





Julen Kalzada garaiko argazkian

**Zer inpresio egin zizun?**

Inork gutxik zekien orduan oraindik ETA zer zen. Nahiko kontrakoak izan zirela gogoratzen naiz apaiz lagunengandik jaso nituen lehen iritziak. EGI ortodoxoarekin egongo ziren haiek.

**Eta geroztik?**

Iurretan nengoen jada ETAren lehen atrakua izan zenean eta Zalbide harrapatu zutenean Durangon. Orduan izan zen abade bat etorri zitzaidana beste hiru mutilekin, [Jose Mari] Eskubi euretariko bat, etxean gau batez gorde ahal nituen galdetuz. Eta orduantxe ezagutu nuen lehen aldiz ETAko jendea.

**Unai ere aipatu duzu lehen.**

Handik lasterrera etorri zen Unai, «ez al nauzu ezagutzen?» esanez. Berehala ezagutu nuen, jakina. «Lukaxen anaia». Antz-antzekoak ziren, izan ere, Dorronsoro anaiak, eta ikaskide izan nuen Lukax seminarioan. Ea etxean lo egiten utziko nion.

**Eta utzi zenion.**

Zelan ez nion utziko, bada? Abade bat izanik mundu guztia hartu behar duena, bekatariak onartu behar dituena, denei lagundu behar diena, kontra egitekotan goiko zanpatzaileei bakarrik... zelan ez nuen hartuko Durangaldeko gazteekin lanera zetorrela finean ziostan mutila? «Zabalik duzu atea», esan nion. «Hor dago argia, hemen logela eta hortxe komuna. Ni banoa Durangora eta konpon zaitez nahi duzun bezala».

**Jabetzen al zinen ETAri laguntzen zenbiltzala?**

Bai, eta esan dizkizut laguntza hori emateko nituen arrazoiak kristau ikuspegitik. Gainera, ez nintzen hori egiten nuen bakarra abadeen artean.

**Egia al da esan izan dena, ETAren azpiegitura sasoi batean abadetxeak zirela?**

Nik horrenbeste ez dakit. Baina nirera etortzen ziren. Unai sarritan etortzen zen, *Mutua* ere etorri zen, (Frantzisko) Larena, batzarren bat ere egingo zuten beharbada, zeren etxea zabalik egoten zen beti. Nik ez nion galdetzen inori zertan zebilen, bakoitzaren askatasuna errespetatzeko ohitura bainuen, eta gustatzen zitzaidan neurea ere errespeta zezaten. Etxeko ateak zabalik uzteko ohitura Orozkon hartu nuen. Ate guztiak zarratuta edukitzeko ohitura zeukaten han, baita abadetxekoak ere. Baina zergatik ateak ixte hori, abade etxeak Elizaren etxeak badira, eta Elizaren etxeak denenak? Nik ez neukan, gainera, lapurren beldurrik. Beraz, ateak zabalik uzteko ohitura hartu nuen, nahi zuten guztiak sar zitezen. Eta halaxe esaten nion jendeari, ETAkoa izan nahiz ez izan: etxea beti daukazue zabalik.

**ETAko jendeari kontzienteki laguntzen zenion, beraz. Jabetzen al zinen horren arriskuaz?**

Jakina, bada. Arriskuaz jabetuta egiten nuen. Halaxe lagundu nion, esaterako, ihes egiten ETAko bati, eskatu zidatelako, Zeanuriko Ipiñaburutik Durangora.



**Zeanuritik? Ez zen izango Artekaletik ihes egindako Etxebarria!**

Etxebarria, bai *(baina ez zen izan Artekaletik ihes egin zuenean, lehenago baino. Barazar igotzen ari zela guardia zibilek kontrola zutela jarrita ikusi, autotik irten eta ihes egin zuenean).* Abade jantzita ekarri nuen Durangora autoan. Jaiak zirela gogoratzen naiz. Han arropak aldatu eta dantzara. Zergatik ez nion lagunduko, bada?

**Eta bitartean *txakurrada* guztia erbiaren atzetik Barazarreko mendietan zehar. Saiak ageri zirela eta mendian hilda egongo zela seguru aski irakurri nion egunkari bati. Arrisku handian sartzea zen hori.**

Banekien, bai, arriskua zela. Baina uste nuen Tribunalak objektiboagoak izango zirela eta jakingo zutela arrazoiak bereizten...

**Horrela uste al zenuen?**

Zergatik ez? Ez al zuten berresten eta miresten hiru botereen elkarrekiko independentzia?

*Honezkero, ez dakigu Julen zintzo ari zaigun ala adarra jotzen bere betaurreko ilunen atzetik. Zera da argi dagoena, abade berri inozo hura bide handiak egina dagoela Lasanta epaile militarraren aurrean aurkitzen denean. Herri Gazteditik Gogor apaiz-mugimenduko aitzindari eta lider izatera iritsi da Julen Kalzada.*

Nik ez neukan orduan, eta ez dut izan sekula ere, lider edo buru izatearen horrelako kontzientziarik. Gu normal ibiltzen ginen...

**Normal ibili bai, baina bazter guztietan ibili. Benetan espero al zenuten Eliza zerbaitetan aldatzea?**

Eragin egin behar zitzaiola, behintzat. Zeren saldutzat eta traidoretzat baikeneneukan eliz hierarkia, Elizak berak iragartzen zuen kristau mezuarekiko. Euskal Herriaren eta langileriaren alde barik, kontra egiten zuelako. Erraz asimilatu genuen, beraz, PTV (Pueblo Trabajador Vasco edo Euskal Lan-

gile Herria) delako planteamendua, 1968ko Derioko itxialdian geureganatu eta landu genuen kontzeptua.

*«Etxebarrietaren mezak» gogoratzen ditu Julenek, garai hartako sermoiak, isunak, sotanadunen manifestazioak eta itxialdiak. Bandas lantegiko grebaren propaganda nola zabaldu zuen... (Trabajadores,* 1968).

**Zabaltzen al zenuen ETAren propagandarik?**

Behin ere ez. Horretan ez ninduen konpromisoan jarri Unaik berak ere. Bere pistolarekin jolasean krik-krak nire aurrean ibiltzea gustatzen zitzaion adibidez, baina bakoitza bere zereginetara gero. ELAkoak, ostera, etorri zitzaizkidan eurenaz konbentzitu nahian, eta haserre egin nien. Gorroto nuen proselitismoa.

**Seminarioko itxialdia sona handikoa izan zen, orduko prentsa birpasatzea baino ez dago.**

Seminarioko apaizak ez ezik, Criado poliziaburua bera ere ezustean harrapatu zuen hirurogei abadek bat-batean egoitza noble hura okupatzeak eta bertan entzerratzeak 1968ko azaroaren 4 hartan. Oso sekretuan eraman genuen.

**Gurpide desgustuz hil zenutela ere zabaldu zuen prentsak.**

Gu barruan geundela hil zen, bai. Behintzat, zerbait lortu genuela pentsatu genuen.

***«Pobre obispo!»*, ezta, Julen?**

Gurpide gotzainak eta biok eduki genuen elkarrizketa labur bateko esaldia da. Gotzaindegian sartuta egon ginen batean, ni bidali ninduten beste birekin Gurpiderengana azaltzera zergatik geunden Gotzaindegian entzerratuta. Eta niri itaundu zidan: *"Quién le ordenó a Usted?»*. Eta nik erantzun nion: *«Usted!»*. Eta bere gogoeta izan zen: *«Pobre Obispo!»*.

**Zer eskatzen zenuten halakoxetan?**

Zanpatuak (Euskal Langile Herria) defenda zitzala Elizak, boteretsuei aurpegi eman ziezaiela, bere barnean demokratiza zedila... Elizaren *demokratizazioari* buruzko jendaurreko debateak ere egiten genituela gogoratzen naiz, orduko *behi sagaratuekin.* Itzultzaile eta guzti. Guk euskaraz eta Martin



Orbe itzultzaile. Alemanez mintzatzeaz ere mehatxatu gintuen haietariko batek, haserre.

*Hitz egin bitartean, kasetearen uhaltxoaz jolasten da Julen bera ere. Ez dirudi urduritasuna, ez ekin beharra, bide batezko entretenimendu paraleloa baizik. Kontatzen dituen gauzak ez zaizkio, maiz, garrantzizkoak iruditzen. Ez dakiela eta ez duela gogoratzen esango dizu sarritan.*

«Maiatzeko egun batez / hogeita hamar hain subertez... gose-greba bat hasi genuen / geure borondatez». Horretaz bai gogoratzen naizela ondo.

**Kontaiguzu zelan izan zen.**

Apezpiku-etxea okupatzea izan zen, bertan gose-greba bat egiteko. Bost ginen, Xabierren bertsoak dioen bezala: Nikola Telleria (kartzelalditik gaixorik irten eta hil zena), Alberto Gabika, Amuriza, Naberan eta neu. Gorritiko apaiza, Arrizibita, berandu samar heldu zen eta ateak itxita aurkitu zituen.

**Betikoa eskatzen al zenuten?**

Betikoa... eta torturen kontrako salaketa. Zabal egin zen komisarietako tortura Mogrovejo-Artekaleko erorketa bueltan. Salbuespen egoeran ere bageunden, agiri famatu hura zabaldu genuenean, Paris Irratitik eta abar, Estatuaren terrorismoa salatuz. Cirarda gotzaina ez zen ausartu gu eskomikatzen, baina bai Poliziari sartzen uzten.

**Min handia eman zien, antza, frankistei. Handiak ziren orduko hamar eta hamabi urteko kondenak, are gehiago apaizei ezartzeko...**

Hori pentsatzen nuen nik ere, baina *«el papelito se las trae»* esan ziguten Cortezo eta Ruiz Jimenez abokatuek. *«Ley de bandidaje y terrorismo»* ezarri ziguten gose-greba hargatik.

*Papertxoak* honela jotzen zuen belarrira:

«Ikusirik giza-eskubide oinarrizkoenak ere zanpatuak darraitela; herritarrak jazartu, atxilotu eta torturatu egiten dituztela, herbestera eraziz edota eperik gabe espetxeratuz, indarrean dirauen Erregimenari salduta dauden tribunalen kondenaren zain,

»Ikusirik ehundaka langile sartu dituztela komisaldegietako kalabozoetan, AHV, Babcock Wilkox, C.C. Naval eta gainerako lan gatazken ondorioz, euretariko askok lanpostua galdu duelarik eta beste zenbait Basauriko presondegian delarik auziaren zain,

»Ikusirik zeinbesteraino gogortu den jazarpena, su-armen pean buruturiko atxiloketak eta tortura, sinestea ere zail egiten den punturaino...

»Ikusirik, esandako guzti horren ondorioz benetako terrorismo-giro baten bizi dela herria, eskubide oinarrizkoenak ere ukaturik eta torturaren eta poliziaren etengabeko mehatxuaren pean...».

**Burgosko epaiketan ere izan zinen akusatuen aulkian.**

Hura ere bitxia izan zen. Lasantak Martutenen libre utzi ondoren, hara non datorkidan militartxo bat, hiru galdera egin, nik ezetz denari... eta auzipera besterik gabe. Dena dela, lotsatuta nengoen ni han. Hainbeste heriotza zigor eta niretzat sei urte eta egun bat baino ez zuten eskatzen. Ez nuen ulertzen, gainera, zergatik sartzen ninduten ni judizio hartan. Bazela uste nuen nire aurrekorik.

**Baina 12 urte eta egun bat ezarri zizuten azkenean, ezta?**

Eskerrak. Ez zen hori ere asko *bandiduei* laguntzearren.

**Zer gomuta daukazu Burgosko epaiketaz?**

Hunkigarria izan zen. Luzatuz eta luzatuz zihoan. Gisele Halimi abokatu paristarra estu zegoen, lar luzatzen ote genuen. Denon artean prestatzen genuen zer esan behar zuen gutariko bakoitzak, eta nik neuri zegokidana esan nuen. Judizioa apurtu genuen eguna hunkigarria izan zen. Denok zutik eta besoa gora *Eusko Gudariak* kantatzen... Francoren erregimenaren kontrako epaiketa nola bilakatu zen. Eta Burgosetik Zamorara berriro Jon Etxabe eta biok. Franco hil eta urtebetera atera gintuzten Zamoratik, 1976an.

*Hamasei urte gehiago ditu orain Julenek jaiotetxean, Etxebarriatzen, hizketan dihardugunean. Etxe ondoa dena zuhaitza, Euskal Herriko zuhaitz mota guztiak bertan landatzen*



*ahalegindu baita Julen. Baina zuhaitz berezi bat dago bertan. Haraxe eraman gaitu gure protagonistak: «Hona Zamorako patiotik ateratako landarea, zuhaitz eginda!».*

**Zelan liteke hori!**

Bada, kontatuko dizut: dena hautsez eta gedarrez beteriko patio txiki bat geneukan Zamoran, tximinia erraldoi baten ondoan. Udaberrian iristen zen eguzkia eta urrian ezkutatu berriro. Porlanez gogorturiko hartxintxarrezko patio hartan ibiltzen ginen gu paseoan eta *pilotaka*, jainkoak dakien moduan. Halere, bere puntu ahula zeukan patio hark ere: porlanik gabeko zerrenda bigun bat, patio osoa zeharkatzen zuena eta mirari guztien gune bihurtu zena. Hantxe lurperatzen genuen *Osaba Joxe* tunela egiten genbiltzanean kanpoko lagunekin komunikatzeko geneukan walkie-talkiea, irrati txiki bat, kanpotik iristen zitzaizkigun panfletoak... hainbat ezkutuko tresna eta misterio.

Baina tunela, 13 metroko segurtasun esparrua zeharkatzen zuen obra hura, *erori* egin zen irteteko dena prest zegoenean; baita, tunelarekin batera, patioko misterio guztiak ere. 1972ko urriaren astearteak hamahiru, urte bisiestoa. Konkordatu Kartzela harekin nazka-nazka geundenez (ez ei zitzaion deitu behar *Cárcel Concordataria* ere, *Carretera de Almaraz,* nº 2 baizik), den-dena haustea lortu genuen. Koltxoiei eta altzariei su eman genien, kapera ere ez zen salbatu, eta kristalak, komunak, mahaiak, telebista eta apurtzeko zen guztia birrindu egin genuen, funtzionarioek erreakzionatu zutenerako eta makilaz hornituriko errefortzuak etorri zirenerako. Zigor gogorrak merezi izan zituen funtzionarioek eurek *El tornado* deitu zioten ekintza bandaliko hari. Milioi batzuetako isuna (gero indultuak barkatu ziguna) eta lau hilabeteko zigor-gela. Gose-grebari segituan hasiera ematea erabakita geneukanez, «gainerako preso politikoekin bildu arte ala hil arte», zigorra zigor eta erdi bilakatu zen. Hil arte ez, baina azkenetararte jo genuen. Madrilgo ospitalera eraman gintuzten eta erabakirik ei zegoen beste espetxe batzuetara aldatzea,

baina azken uneko Ministro Kontseilu batek sententziatu ei zuen gu berriro Zamorara itzultzea.

Huraxe izan zen niretzat kartzelako unerik latzena. Amaitu ziren nolabait, edo amaitu gintuzten kasik, gose-greba haiek ere (nik bitartean kolorezko bisioak ikusten nituen), igaro ziren nonbait udazkena eta negua gu zigor-geletan geundelarik (bitartean Carrero ere hegaz egina zela enteratu ginen, hilabetera edo, behar bezala zentsuratu gabeko *Correo de Zamora* atzeratu baten futbol-partida haren aipamenak *«se guardó un minuto de silencio por el vil asesinato del Almirant,..!»*. «Ostia!» zioelako), atera ginen kalabozoetatik ere, agertu zen udaberriko eguzkia... eta hiru-lau zentimetroko landaretxo bi topatu genituen patioaren zerrenda mirakulutsuan erne berri. Haiek jagoteari ekin genion gogoz, izotzetik eta inurrietatik zainduz, ura egunero birritan... Francori budua egiten genion bitartean orratz-sistema hutsezin batez. Haziz zihoazen landaretxoak eta zimurtuz eta ustelduz agurea. Azkenean, gehiago egin zioten landare gazteek Caudillo Ahaltsuari, eta Zamoratik soinean ezkutaturik bizirik ateratzea lortu genuen haietariko bat eta Etxebarriatzen landatzea. Hementxe dakusazun okaran gorri lerden hau.

*Paraje ezin ederragoan bizi da Julen, Laida eta Kanalaren aurrez aurre Urdaibaiko itsasadarrean. Kartzelan zegoelarik, egin zuen behin Etxebarriatzera buelta bat. Poliziaz eta guardia zibilez inguraturik eta eskuak loturik ekarri zuten Julen bere amaren hiletara. Busturialdea ondo zaindurik zegoen egun hartan, eta gerraontzi bat Bermeo parean. Zeren beldur ote ziren, bada? ETAren beldur, jakina.*

(...).



BIGARREN ATALA

Hamaika lekuko, hamaika

(kartzelan sartu zituzten urtearen arabera ordenatuta)

## FELIPE IZAGIRRE.
## ZAMORAKO KONKORDATU KARTZELA: IRAGANA OROITUZ

Felipe Izagirre

*Herria ez dut maitatu.*
*Denon aurrean aitortza*
*egin beharra naiz*
*zuen arteko naiz eta*
*zuen apaiz.*
*Barkatu, barkatu*
*Herria ez dut maitatu*
Julen Lekuona

Esker ona
Nire arreba Asuncioni eta Xabier koinatuari, beti nire ondoan izan ditudalako; Juan Mari Bandres eta Miguel Castells abokatuei; Bermeoko Anton Ormaza, Arantza San Pedro, Gurutze, Zuriñe, Arantza Apraiz, Roberto eta Karmeleri, Bermeon bidaide izan nituelako; eta Mari Tere Alberdiri hain historia polita biziarazi zidalako. Eta Juan Mari Zulaikari bide berria urratzen konplize izan nuelako.

Eskaintza
Francoren diktaduraren kontra borrokatu ziren guztiei.

### 1. Sarrera

Iragana orain bihurtzea –nahiz eta oraina iragana ere baden– ez da hain erraza, kontuan hartzen badugu garai haiek orduko testuinguruan kokatu eta adierazi behar direla, ahalik eta objektibotasun handienarekin; esan nahi baita, gaur norberak duen ideologiak, ikusmoldeak eta bizitza filosofiak ahalik eta proiekzio txikiena jaurti behar duela gertakari haietara.

XXI. mendean, 2009an bizi gara-eta, Zamorako kartzela bizi izan genuenok, batez beste, 60 urtetik gorakoak gara. Dena den, iragana, arestian esan bezala, oraina ere bada, eta

nahiz eta norberak bere bizitzan aldaketa anitz izan, hor dago iragana, eta, beraz, saiatuko naiz garai hartako pentsamendua, bizipenak, krisiak eta sentipenak ahalik eta modu zintzoenean agertzen. Nireak dira, eta nik besteekikoei diedan errespetu bera eskatzen diet neurekikoei.

Bestalde, esan nahi dut, Arantzazukoa bukatu ondorengotik abiatzea ez dela kapritxo bat izan; alderantziz, beharrezko iritzi izan diot Zamora aurretikako bidea agertzeari, hor hasten baita Zamorara eramango nauen bidea.

## 2. Arantzazutik Bilbora

Urtea 1964.a zen. 28 urte nituelarik Arantzazuko garaia amaitu eta Bilbora etorri gineneko urtea. Hamahiru urte ondorengo lehen irtenaldia zen, eta bazekarren idealismo eta ilusio ugari. Arantzazun ikasleak ginen eta ez genuen herriarekiko harremanik, eta kolpetik Bilbora, non edozerk harritzen gintuen.

Urte zailak eta gogorrak ziren gure herriarentzat, eta egoera horretan, garbi neukan Ebanjelioaren iragarle izan behar nuela. Nire konpromisoak justiziaren eta askatasunaren aldekoa izan behar zuela. Orduan esan ohi zen bezala, «lekuan lekukoak eta herrian txertatuak».

Herriak arlo askotan pairatzen zuen errepresioa. Hizkuntzak ez zuen lekurik gizartean, eta Eliza ez zen salbuespena. Ez gure komentuan ez Elizan, eta gure harremanetan ere ez. Dena den, Bilboko komentu inguruan bizi zen familia baten bidez euskal giro hori ezagutuz joan nintzen. Familia hura Bilbao zen abizenez. Gustura ihes egiten nuen haien etxera, han beraiekin ez ezik, etxe hartan ezkutatzen ziren zenbait militante ospetsurekin ere jarduten bainintzen. Aire freskoa zen hura dena, eta konpromisoan jarraitzeko motibagarri. Ezagupen horren haritik hasi nintzen La Salletarren ikastetxean euskarazko klaseak ematen. Eta hango anaia baten bidez ezagutu nuen Klaudio Gallastegi, herriarentzat don Klaudio, San Antongo parrokoa. Zintzoa bezain sendoa zen don Klaudio. Mezetan egia biribilak esaten zituen. Euskaraz ere ematen zuen meza, eta han biltzen ziren euskaldunei zenbait abesti zuzentzen nizkien. Oso gauza xumea zen, baina niretzat oso atsegingarria; gure komentuan falta zen zerbait sentitzen nuen eta, neurri batean, nire konpromisoa errealitate bihurtzen zen.



## 3. Bilbotik Bermeora

Bermeo izan zen Bilbokoaren ondorengo jomuga. 1965. urteaz ari naiz. Nahiz eta Bilbon banuen euskal giroko jendearekin harremanik, Bermeo izan zen, konpromisoari dagokionez, herrian buru-belarri sarrarazi ninduen lekua; apaiz mailan ari naiz betiere, noski. Hainbat lekutatik hasi nintzen herriaren aldeko konpromisoan: aldaretik egiten nituen sermoien bidez, eta eskolatik ere bai, ahal nuen neurrian, fraideek zuten eskolan klaseak ematen bainituen. Ahal nuen neurrian diot, eskola hura orduko edozein eskola bezalakoa zelako, hots, eskola nazionala. Zalantza dut Francoren irudirik agertzen zenetz. Dena zen gaztelaniaz, irakasgaiak eta komunikazioa, nahiz eta Bermeoko mutiko haiek beren artean euskaraz egin. Sasoi hartan kultur arloan konprometituta zebiltzanekin ere harremanetan nintzenez, horrek urrats berriak egiten lagundu zidan.

Sermoietan egoeraren etengabeko salaketa egiten nuen, garai hartan beti baitzegoen zerbait salagarri. Bizkaieraz ere poliki ikasi nuen. Gogoan dut Francoren garaiko erreferendum hura –1966-12-14– gogor salatu nuela eta esan ere esan nien bermeotarrei Francoren alde bozka ematea Gernika bonbardatu zutenen alde ematea zela. Ondorioz, Bermeoko kuarteletik izenpetu gabeko gutuna jaso nuen, emaitzak enpa-

txua eman zidala eta horrelakoak esanez. Eta horrelako beste zenbait gutun ere jaso nituen, denak kuarteletik, noski.

Garai hartako euskararen egoerari dagokionez, banituen bi fraide oso lagun nituenak eta euskararekiko guztiz konprometituak: Imanol Berriatua eta Jon Azurmendi. Gotzon Garitonaindiak, Bermeoko auzunetakoa den Mañuako parrokoak ere, euskara mailan asko egin zuen, eta denon artean euskarazko klaseak antolatzen hasi ginen herrian. Garai hartan hasi ziren ikastolak sortzen eta, bertako talde baten laguntzarekin, Bermeon ere sortu zen, 1967ko urtean.

Baina ez zuen luzaro iraun nire pozak.

## 4. Bermeotik Granadara

Susmoa dut fraideak beraiek izan zirela *persona non grata*tzat hartu eta probintzialari burua berotu ziotenak ni Bermeotik alda nintzan. Egia esan, nik ez nuen nagusiak edo guardianoak nahi zuen bizitza modua egiten; zenbait eginkizunetan sartuta bainenbilen eta komentuko bizitza eta ordutegia ez baitzetozen bat herriarenarekin. Guardianoaren eta beste zenbaiten iritziz, gure bizimodua ez zen fraide batentzat egokia, hori politikan sartzea baitzen. Bi ikuspuntu ziren auzitan, baina beraiek agintzen zuten eta galtzaile ginen. Eta ni Bermeotik urruntzea lortu zuten.

Eta nora aldatuko, eta Granadara, militarren kaperau. Ai zer-nolako jauzia! Baina fraide ginen; obedientzia botoa egina genuen, eta horrek, agindu absurduenaren aurrean ere, agindua betetzera behartzen gintuen. Agindu horiek, askok edo gehientsuenek, zigor kutsua zuten, eta fraide nagusiek ere sadismo ukitu bat ere bazuten eta, horrekin batera, boterea ere bai gu beren menpe edukitzeko. Botoek, askatasuna, sexualitatea eta autonomia ukatuz, despertsonalizatu egiten gintuzten. Dena den, joan aurretik burutik pasatu zitzaidan Bermeon guardia zibilekin arazoak izan banituen, militarre-



kin are gehiago izanen nituela. Baina ez zegoen txintik egiterik eta han joan nintzen. Eta denborak arrazoi eman zidan.

Granadan, Andaluziako frantziskotarrek zuten ikasle egoitzara joan nintzen 1967ko apirilean. Militarrak ezagutu aurretik, fraideak izan ziren aurpegi ilunez hartu nindutenak. Euskal Herriko egoera telebista bidez ezagutzen zuten eta ETA hasia zen bere ekintzak egiten; euskaldun susmagarritzat hartu ninduten. Dena den, han geratu nintzen. Orduan, horrelako jarrerek ez zidaten arazorik sortzen.

Granadako esperientzia guztiz bitxia izan zen. Guztion buru zen kaperau militarra ezagutu orduko, militar-militarra zela konturatu nintzen. Ez dut uste hark Ebanjelioarekin zerikusirik zuenik. Han izendatu zidaten kuartela. *Automobilismo* zeritzan kuartelak, eta Granadan, hirian bertan zegoen. Nire eguneroko lana kuartela bisitatzea zen. Ez zen asko behar hango ustelkeriaz jabetzeko. Nik berez soldaduengana jotzen nuen, baina koronelak berehala eman zidan aholkua: nik soldaduengandik aparte egon behar nuela, nire estatusa ez baitzen soldaduena, goi-mailakoena baizik. Horrez gain, igandeko mezatan beti esaten nien gustatzen ez zitzaien zerbait, eta hori ere aurpegiratzen zidaten. Baina ni neurean. Apirilean joan nintzen eta uztailaren 10ean, San Kristobal egunez, Granadako katedralean, non Eliz eta agintari zibilak bilduta zeuden, orduan gaurkotasuna zuen Juan XXIII.aren entziklika azaldu nien *Pacem in terris*, justiziaz eta libertateez hitz egiten zuen entziklika, alegia. Entziklikaz hitz egin, hango egoerari lotua. Erraza da bururatzea zer-nolako istilua sortu zuen. Baina soldadu gizajoen egoera ezagututa, esan beharra neukan. Militar batek baino gehiagok esan zidan fusilatu egin behar nindutela. Baina gazteak ginen, ilusioz beterikoak, eta konpromisoaren ondorioak ziren. Egun batzuk barru, Granada probintziako Bazako komentu batera desterratu ninduten hilabeteko zigorra betetzera. Han harrera nahiko ona izan nuen. Bi fraide murtziar zeuden, eta haiek, Granadakoekin alderatuz, aingerutxoak ziren. Hilabete igaro eta armadatik

bota ninduten. Niretzat ohorea zen horrelako erakunde batetik kanporatua izatea. Bizitzari alderdi onak bilatzen ere ikasi genuen, eta egun politak iragan nituen Bermeoko Karmele Telletxea, Roberto Bilbao eta Gotzon Garitaonaindiarekin, Granadara nirekin egotera etorri zirenean.

Itzuleran, 1967ko irailean, frantziskotarren probintzialak hartu zuen jarrera militarrek hartutakoaren antzekoa izan zen. Ezertxo ere galdetu gabe hartu ninduen; alegia, zer esan ote nuen sermoian eta beste. Hilabeteko zigorra betetzen nengoela ikustera ere etorri ez zen probintzialak beste fraide bat bidali zuen ezertxo ere galdetu ez zidana. Seguruenik, nik gaizki egin nuela pentsatuko zuen, eta berak zuzenduko zuela nire okerra. Gogoratzen naiz Bermeotik talde bat etorri zela probintzialarengana, ni Bermeora itzul nendin eskatzera, baina ez zuen amore eman, eta alternatiba hau eman zidan: Ameriketara ala Valladolidera. Berriro ere obedientzia botoa, berriro askatasunik eza, berriro itsu-itsuan agindua bete beharra. Esan dezadan gaur oraindik probintzial izandako fraide hori bizi dela. Gipuzkoako herrixka batekoa izanik, kontzientzia gutxi eduki behar zuen garai hartako errepresio giroa ez bizitzeko. Nik uste dut txikitako euskara ere galdua zuela. Baina horrela jokatu izan du Elizak eta erlijioso ordenetako nagusiek. Eta ez diet entzun *mea culpa*rik.

Ez nengoen Ameriketara joateko. Hemen jarraitu nahi nuen eta Valladolidera abiatu nintzen 1967ko urrian. Banekien jakin han ere militar asko zegoela eta zerbait gertatuko zelako susmoarekin joan nintzen. Komentua Kantabria probintziakoa zen, esan nahi baita Arantzazu, Valladolid edo Burgosko komentua probintzia berekoak zirela. Beraz, euskaldun fraideak bazeuden, baina giroa erabat frankista zen. Hala ere, garai hartan Valladoliden euskal ikasle asko zegoen eta, arnasa pixka bat hartzekotan, haiekin jarri nintzen harremanetan. Han ezagututako asko gero errepresioaren biktima izan ziren, eta bakarren bat kartzelan aurkitu nuen gerora.



## 5. Valladolidetik Eibarko lantegira

Valladolideko giro hotz eta arraro hartan nengoela, esan nahi baita, komentuan ez nuela inongo berotasunik sentitzen, seminarioko lagun batengandik, Juan Mari Zulaikarengandik, gonbita jaso nuen Eibarra langile joateko 1968ko otsailean. Egia esan, Granadan nahiz Valladoliden, nire bihotza eta gogoa Euskal Herrian zeuden. Diktaduraren aurkako borroka goraka zihoan, eta gero eta ugariagoak ziren Eliza ofizialetik at diktaduraren aurka borrokatzen zirenak.

Erabakia gogorra izan zen. Baina gazteak ginen. Ez Eliza ofizialarekin eta ez gure nagusiekin ez genuen inongo harremanik eta, bestalde, pobreenen ebanjelioak ere horretara bultzatzen gintuen. Testigantza eman eta erakutsi nahi genuen.

Eibar langile herria izanik, borrokan ari ziren zenbait mugimendu eta sindikatuekin harremanetan jarri ginen. Euskal Herrian eta Estatu osoan hasi berri zen *apaiz langileen mugimendua*, Europan ere bai, noski, Frantzian batik bat. Gurekin batera, baziren Jesusen Lagundikoak, apaiz sekularrak ere bai, eta noizbehinka bildu ohi ginen, gure lanaren inguruan hausnarketa egiteko. Halaber, komentuko zenbait lagunek ere bilerak egiten genituen, geure aldetik, fraideen bizitzari beste norabide bat emateko asmotan. Garai hartan anaidiak sortu nahi ziren komentuen ordez, herrian txertatuak eta, edozein herritar gisa, lanaren soldatatik bizi behar genuen. Nahiko kontraesan bazegoen gure baitan. Izan ere, nola bizi beste edozein herritar bezala, gainean genituen boto eta aurreiritziekin. Baina gaztetasunak eta utopiko izateak berarekin daramatza kontraesan horiek guztiak. Euskarari ere garrantzia eman nahi genion eta salatu ere salatu genuen garai hartako komentu gehienetan gaztelania zela mintzabide (aipatu behar da gu izan ginela eta ez, noski, probintzialaren gogoz, lehen anaidia sortu genuenak historialariren batek besterik idatzi badu ere). Jakina, gu, utopikoak, arauetatik kanpo genbiltzan eta gurea ez zen Anaidia. Gu komentutik irtendako

txoro antzeko batzuk ginen. Besterik izango zen Alemaniara edo ikasketak egitera joan izan bagina, baina... (Iztueta, 2001). Historialariek badute historia manipulatzeko trebetasuna. Beti pentsatu izan dut nagusiek ez zutela guztiekin tratu berdina erabiltzen. Hori ere aztergai litzateke ea zer dagoen jokabide horretan, lehen aipatu dudan kutunkeria horretan, alegia. Gai luzea bezain interesgarria litzateke jarrera horiek psikologia aldetik aztertzea. Dena den, gerora gure jarrerak jarraipena eduki zuen eta fruitua eman zuen.

Itzul nadin Eibarra. Langile eta herri mugimenduak aurrera zihoazen. Langile komisioak, Elizaren langile mugimenduak (JOC, HOAC, eta abar), eta gu han tartean. Elizgizonak izanik, Guardia Zibilak ez zuen besterik behar: bi fraide langile! Bitxia izan da: indar errepresibo eta diktadurarentzat, elizgizonak arriskutsuagoak izan dira zenbait militante baino. Guk ez genuen inongo esperientziarik, baina bazirudien bi iraultzaile ginela. Borondate ona genuen eta jende artean bizi nahi genuen, eta dena berri egiten zitzaigunez, saltsa guztietan sartzen ginen. Horregatik, Poliziak ere laster ezagutu gintuen. Frantziako 1968ko maiatza ere Eibarren bizi izan genuen, eta benetan aberatsa izan zen, lehen esan bezala, guretzat dena berria baitzen. Egoera honetan gertatu zen ekainean Txabi Etxebarrietaren heriotza eta Iñaki Sarasketaren ihesa. Kasuak Euskal Herri osoa astindu zuen, eta herrietan antolatzen ziren mezak diktaduraren aurkako pizgarriak izan ziren. Hiletak han-hemenka hasi zirenean, Poliziak neurri errepresiboak hartu zituen. Eibarren, esaterako, karmeldarren elizan antolatu zen hileta elizkizuna. Ordua heldu zenerako, Poliziak dena inguraturik zuen. Gu ere jende artean ginen, noski.

Askotan ez da erraza jakiten gizakiok nondik ateratzen dugun kontra egiteko indarra. Fraide langileak ginen. Artean sinesmen berezi bat nuen Ebanjelioarekiko eta, agian horregatik, Poliziari aurre egitea erabaki genuen. Istiluak hasi zirenean gu aurre-aurrean ginenez, Poliziak gure aurka egin zuen. Baina han bertan atxilotu beharrean, nire lagunaren familiar-





Txabi Etxebarrietaren hilketaren hamargarren urtemugako kartela

teko baten etxean atxilotu gintuzten. Izan nituen beste zenbait atxiloketa, hala nola Donostiako urte hartako Aberri Egunekoa, baina Eibarko kuartelean jasandakoa gogorra izan zen. Jakina, guardia zibilen egoera ere halakoxea zen. Beren arteko bat hil zuten, eta bere onetik aterata zeuden atxilotu eta kuartelera eraman gintuztenean. Bata bestearen atzetik sartzen ziren, eta galdeketarik eta ezer gabe, egurra eman eta egurra eman. Gorputza ondo ubelduta utzi ziguten. Garai hartako argazkiak dira lekuko. Pasadizo bat da, baina esan beharra dago: bisitatu gintuen fraide bakarra aita Agirretxe izan zen.

Tramite ofizialak egin, eta Martuteneko kartzelara. Pozik geunden. Izan ere, gure ilusiorik handiena beste presoekin egotea zen. Jarrera hori garrantzitsua da Zamorako kartzela zergatik ireki zuten jakiteko, hasiera-hasieratik nahi baikenuen beste herritarrekin egon, inongo pribilegiorik gabe. Baina Martutenen ez genuen aukerarik gainerako presoekin egon eta hitz egiteko. Epaia gainean genuen, baina berehala utzi gintuzten aske; baldintzapean, noski. Gertaera horrek eman zion amaiera Eibarko gure egoerari eta esperientziari.

## 6. Zamorako Konkordatu Kartzela

Etxebarrieta hil zeneko gorabeherak iragan ondoren, urte hartako Donostiako Aberri Egunean atxilotu eta jarri ziguten isuna betetzeke geneukan. Eta, nire ustez, ETAk abuztuan Meliton Manzanas hil ondoren, gauzak azkartu egin ziren. Errepresioa areagotu egin zen, eta guri isuna betearazi nahi ziguten. Bizirik zegoen Konkordatuaren arabera, erlijiosoak ginenez, isuna komentu batean bete behar genuen, Euskal Herritik kanpo, noski. Baina ez geunden prest. Arestian aipatu dudan bezala, guk garbi geneukan, eraman genuen bizitza eraman ondoren, beste herritarrei ematen zitzaien trataera berdina nahi genuela. Eta jarrera horri azkeneraino eutsi genion. Elizarentzat, ordea, beste buruhauste bat gehiago ze-



karren gure jarrerak. Probintzialak deitu zigun, eta esan ere esan zigun komentu batera joan beharko genuela. Baina kasu horretan ez zegoen obedientzia botorik. Eta ezetz esan genion; guk kartzela batera joan nahi genuela, beste edozein herritar gisa. Pentsatzen dut probintzialak, Francoren morroi zintzo bezala, jakinaraziko ziela gure jarrera bere nagusiei, Elizaren hierarkiari, alegia.

Horretan geundela, Alberto Gabikagojeaskoa, Bizkaiko apaiz sekularra, Dueñasko monasterioan zegoen kondena betetzen. Baina jende asko joaten zitzaion nonbait bisitan, eta hori ez zuten ongi ikusten Gobernuak eta monasterioko monjeek. Egoera hori saihesteko asmoz, Zamorako kartzela handian kondenatu gabeko presoentzat zegoen kartzela txikia egokitu zuten. Hori dena, jakina, Gobernuaren eta Elizaren arteko kontua edo ituna zen. Horrela, dirudienez, konkordatuaren espiritua mantentzen zuten, eta gure asmoa eta jokabidea izorratu. Elizaren kasuistikak ez du mugarik! Presoengandik aparte, leku txiki ilun batean sartu gintuzten. Ziria ongi sartu ziguten. Gabika eraman eta handik egun gutxira eraman gintuzten gu. Hori bai, auto ofizialean, baina Zamoran estreinatu berri zuten kartzelara. Albertorekin bete genuen geure lehen isuna; hilabetekoa izan zen lehen egonaldia.

Niri dagokidanez, esan behar dut Elizarengandik sentitzen nuen urruntasuna areagotuz zihoakidala. Praktikan erabat kanpo geunden. Ez genuen inongo harremanik fraideekin. Nik uste lasai geratu zirela praktikan kanpoan geundela ikusirik.

## 7. Zamorako bigarren espetxealdia

Bigarren espetxealdi horrek badu bere garrantzia. 1969ko apirilaren erdialdera, beste isun bat ordaintzeko agindua jaso nuen. Izan ere, Eibarren atxilotu izatearekin batera zetorren epaiketaz gain, isuna ere jarri ziguten. Agindua betetzeko as-

moz Gobernu Zibilera joan nintzen, eta polizia *sekretak* deitzen ziren horietakoek Zamorako espetxera eraman ninduten. Auto dotorean, eta itxuraz modu onean, nahiz eta praktikan Zamorako kaiola txiki ilun hartan egon behar. Artean Zamorako kartzela aski hutsik zegoen. Orduan uste dut Lukax Dorronsoro han zegoela.

Zamorara joan aurretik, Artekaleko atxiloketa gertatu zen, Burgosko epaiketa famatuan epaitu zituztenak: ETAko liberatuen atxiloketa, alegia. Eta atxiloketa horren inguruan berri asko zabaldu zen egunkarietan, eta zenbait berri gezurtatzeko, unibertsitatean propaganda zabaldu zuten. Nik ere jaso nuen propaganda hura, eta argitaratzea erabaki ere bai.

Argitaratzeko baliabide eskasak genituen, baina, halere, moldatu ginen. Bosteko talde bat osatu eta batek papera, besteak kopiagailua, hor ibili ginen, Hondarribiko kaputxinoen komentuan ahal genuen moduan argitaratzen. Dena prest utzi genuen eta, ezertxo ez baneki bezala, isuna betetzera joan nintzen. Jada Zamorako kartzela ezaguna egiten zitzaidan, baina denboraren poderioz, martxa hartuz zihoan.

Berriro barruan nengoela, engainu baten biktima izan nintzen, ordea. Aske aterako nintzela esan zidaten; ez dakit, kondena bertan behera utziko balidate bezala, baina, bai zera! Poliziak kanpoan zain nituen, eta Donostiarako bidea hartu zuten. Susmo txarra hartu nion, eta Donostiako komisariako bidean hainbat jira-buelta eman nizkion buruari. Ziur nintzen engainu hark bazuela zerikusik kartzelara joan aurretik prestatutako propagandarekin. Eta halaxe izan zen. Orduan kaputxino zen Pablo Muñoz, autoan propagandarekin zihoala, atxilotu egin zuten. Maiatzaren bezpera zen. Denok erori ginen. Orduan Sanz zen komisarioburua, eta ederki egurtu ninduen. Gizon mardula zen. Ez nuen inoiz, ezta Etxebarrietaren mezaren ondoren ere, horrelakorik inoiz jasan. Torturak gogorrak izan ziren, baina saiatu nintzen burua bere lekuan mantentzen. Poliziek jakin nahi zuten nik propaganda hura nondik eta nola jaso nuen. Koartadak asmatu behar ziren,



informazio haria han moztu, nire ondorengorik ez atxilotzeko. Oraindik, ofizialki, bederen, fraide nintzen. Jende asko ezagutzen nuen, eta nola edo hala lortu nuen haria moztea komisaldegitik kartzela bidean; eskumuturrak odoletan neramatzan eskuburdinen ondorioz, baina barnean pozik nintzen, ondorengorik ez nuelako kartzelara eraman.

Donostiako komisariatik Martuteneko kartzelara. Hala ere, Martutenekoak ez zeukan zer ikusirik Zamorakoarekin. Hemen preso politikoekin nengoen. Beste kontu bat zen. Martutenen zeuden ETAko historiko asko, hala nola, Unai Dorronsoro, Xabier Larena, Jokin Gorostidi eta Jesus Apraiz. Han zeuden, halaber, nirekin eroritakoak, hala nola, Kike Arizmendi. Niretzat dena berria zen. Hango ordutegia, eztabaidak, dendena. Gogoan dut gaur egun oso progresistatzat diren mezak Martuteneko espetxean egiten nituela; ardo normala, ogia ere bai eta testu iraultzaileak. Abestiak ere protesta gisakoak izaten ziren. Benetan hura liturgia modernoa zen. Baina, halere, niretzat forma horiek denak adabakiak ziren, egungoak izan daitezkeen bezala, eta poliki-poliki iraganean galdu ziren. Azkenean ez zuten zentzurik, sinesmena ere galduz joan baitzen.

Militarrek epaitu ninduten. Epaimahaiburu militarrak Lasanta zuen izena. Garai hartan famatua zen. Eta hogei urteko eskabidea bota zidan, plaust. Ez dakit nolakoa izan zen nire erreakzioa. Gogorrena zera izan zen: kartzelako gelan isolatuta nengoela jaurti zidala. Komunikaziorik ezak zama astunagoa bilakatzen zuen. Familiartekoak eskabidea jakin bezain laster hasi ziren han-hemenka ateak jotzen. Gogoan dut Atotxako frantziskotarren etxera joan zirela, baina atea itxi zietela. Esan behar dut, gu epaitzeko, gotzainaren eta probintzialaren baimenak behar zituztela. Joan Mari Bandres nuen abokatu, eta mugitu zituen zeru-lurrak halakorik eman ez zezaten, baina alferrik. Militarrekin bat egin eta konplize izan ziren, eta eman ere bai lotsa gutxirekin! Gotzaina Jacinto Argaia zen eta probintziala Marcelino Arruabarrena, Grana-

datik itzuleran «Ameriketara ala Valladolidera?» esan zidana. Martutenen nengoela, ez zidaten bisitarik egin. Baina espero ere jada ez nuen ezertxo espero. Nire gain hartu nituen ondorio guztiak. Berehala bukatu zen Martuteneko egonaldia. Esperientzi ezin hobea.

Abuztu aldera, epaiketa. *Sumarísimo*a egin ziguten. Atxilotu eta berehala egiten ziren epaiketa *sumarísimo*ak. Burgosen, Juan Mari Bandres nuen abokatu, eta hogei urteko kondenatik hamarrera jaistea lortu zuen gizonak. Esan zidaten, familiartekoez gain, Bermeotik ere joan zen autobusen bat eta, beti bezala, han zen gure Aita Agirretxe, aurpegia emanez. Eta epaiketaren ondoren, berriro Zamorara. Bukatu ziren isunak, kondena txikiak. Oraingoan hamar urteko kondena neraman. 1968ko abuztua zen.

## 8. Hirugarren espetxealdia Zamoran

Oraingo honetan, Zamorako kartzelan jende gehiago zegoen. Errepresioa gogortuz zihoan, erorketak ugariagoak ziren, eta beti apaiz edo erlijiosoren bat tartean. Hain gutxi behar zen militarren esku jartzeko. Oraingo honetan, bada, jende gehiagorekin egin nuen topo. Bilboko Gotzaindegian gose-greba hasi zuten bost apaizak: Alberto Gabika, Josu Naberan, Julen Kalzada, Xabier Amuriza eta Nikola Telleria; Jon Etxabe apaiz liberatu eta Mogrovejon atxilotua; Jose Mari Madariaga, Bereziartua eta, berehala, Mariano Gamo madrildarra etorri zen Paularreko monastegitik; Martin Orbe ere garai horretakoa zen.

Zeure buruan kondena luzea duzunean, saiatzen zara, lehenik, ahal den neurrian onartzen eta, ondoren, kartzelako bizitza antolatzen. Biziraupen kontua da. Ni neu, pertsonalki, nahiko frustratuta nengoen Elizarekin, ezer gutxi espero bainuen. Krisia gainezka egiten hasia zen, batik bat, ez zuelako ezertxo ere egin guk kondena gainerako presoekin bete genezan. Frustrazioa hor zegoen, baina oraindik ez nuen erabaki garbi bat hartua.



Zamoran geundenok familia beretik gentozen, esan nahi baita, Elizatik. Estatus berezi bat genuen, kasta bat bagina bezala. Beti gertatu izan den bezala, Eliza eta Estatua ongi konpondu ziren gure kontra egiteko. Azaletik ikusita, badirudi estatus horren araberako tratua ematen zitzaigula –autoz eramaten gintuzten batetik bestera, adibidez–, baina sakonean, kartzelako bizitza errepresioz beterik zegoen: janariaren kontrola zela, irakurtzeko edo ezer ikasteko zailtasunak, edozein huskeria nahikoa zen zigortzeko. Baina gizakiok denetara egokitzen gara eta gu ere, neurri batean, egokitu ginen, nahiz eta nork bere zama eraman ohi zuen. Talde gisa funtzionatzen genuen diru kontuan, esan nahi baita, kanpotik iristen zen dirua batu egiten genuela eta diru horretaz baliatzen ginela kartzelako janariaz gain zerbait berezia edo osagarria erosteko. Halaber, talde gisa jokatzen genuen kartzela barruko borrokari zegokionez: gose grebak, eta gisakoak.

Francoren diktaduraren konplizea zen Elizak beti jartzen zuen bere ordezko bat erakundeetan; armadan (banuen nik horretan esperientziarik) eta kartzeletan ere, noski. Zamorako kartzelan ere bazegoen kapilaua, armadan ezagutu nuenaren antzekoa. Gela bat antolatu zuten, meza eman nahi bagenuen edo, baina berehala konturatu zen ez geundela errito horietarako, eta azaldu ere ez zen egiten. Esan behar da kondena kartzelan bete nahi ez zutenek komentu batera joateko aukera izan zutela, eta politika horretaz aprobetxatu zirela zenbait. Errespetu osoz diot.

Gure eguneroko bizitza erabat monotonoa zen. Kartzela txikia eta iluna zen, eta txikitasun horrek aski zaila egiten zuen elkarbizitza. Nire esperientziatik hitz egiten dut. Bestalde, denok apaiz edo erlijioso ginen, ofizialki gutxienez, eta esperientzia gutxi genuen politikan. Ez zegoen gure artean eztabaidarik. Oinarri teorikoak falta zitzaizkigun. Bakoitzak gustukoa zuena egiten zuen eta aurrera. Horrelako giro ba-

tean, normala denez, azpitaldeak sortzen dira, nahiz dela sinpatiagatik, nahiz dela planteamenduengatik, nahiz dela beste edozergatik ere. Talde batean beti sortzen dira nagusiak eta morroiak, eta horrek berak elkarbizitza zaildu egiten du. Ez geunden ohituak elkarren sentimenduak kanporatzen, besteari entzuten. Gure heziketaren ondorioak ziren. Defentsa mekanismo ugari genituen, esan bezala, gure heziketaren isla.

Niri dagokidanez, Elizarekiko edo ordenarekiko krisia azkenera iristear zegoen. Krisiak aldaketa esan nahi badu, aldaketa sumatzen nuen. Ez nuen jada harremanik hierarkiarekin eta nire ordenako nagusiekin. Bakarrik sentitzen nintzen. Ez nuen inongo erreferentziarik. Harreman hori deseginda zegoen, eta sinesmena ere agortua. Banituen harremanak, jakina, familiakoekin eta lagunekin. Ordura arte nire familiakoak izan ziren fraideekin, aldiz, bakar batekin ere ez. Bizitza itogarria egiten zitzaidan. Ez nuen inondik ere ikusten hasierako ideia hura, hots, Zamorako kartzela ireki aurretik egiten genuen planteamendua: hots, beste presoekin egon nahi genuela, haiekin batera. Hori izan zen arrazoi nagusia, baina seguruenik batzuek pentsatzen zuten han egonik diktaduraren kontraesanak areagotzen zirela. Nik ez nuen horrela ikusten. Egokiena zen Zamora uztea. Guk gauza bat eskatu eta beraiek beste bat eman; hori engainu bat zen, eta egokiena Elizarekin apurtu eta normaltasunera pasatzea zen. Baina denek ez zuten horrela pentsatzen. Normala.

Nire krisiari irtenbidea emateko, barnekoari nahiz elkarbizitzakoari, sekulartzea erabaki nuen. Ez nengoen prest falta zitzaizkidan beste zazpi urteak han igarotzera. Banekien zulo batean jaustea zela; hutsetik hasi beharko nuela, baina askatasuna maite nuen, aske izan nahi nuen, eta erabakia aurrera eramatea pentsatu nuen. Behar ziren tramiteak egin nituen: Erromara sekulartzeko baimena eskatu, eta abar. Gogoan dut bidali nuen gutunean garbi adierazten niela lehenbailehen ez bazidaten ematen gose greba hasteko prest nengoela. Ez zuten asko atzeratu, eta etorri zitzaidan sekularizazioa. Eta nor etorriko paperak ekartzera eta probintziala ez, idazkaria baizik. Ez zuen, seguruenik, kontzientzia lasai sentituko. Idazkaria aita Lete zen eta, ezertxo ere galdetu gabe, orria sinarazi zidan eta agur. Ez «nola zaude?» bat, edota «zerbaiten beharra ba al duzu?», edozeinek egoera horretan egingo lituzkeen galderak. Baina gizatasunik, bihotzik ez dagoenean, ez dago ezertxo ere, indiferentzia izan ezik. Esaldi bat bada nik erlijioso izan naizen denboran bizi izan dudana: «Maitatu gabe bizi izaten dira eta negar egin gabe hiltzen dira». Baina egitura hori hautsi nuen. Nire estatusa galdu nuen. Jada normala nintzen; pribilegio guztiak galdu nituen, eta preso politiko arrunt bilakatu nintzen. Barne askatasuna lortu nuen eta horrekin krisia, aldaketa etorri zen. Jada ez nintzen Elizaren menpe. Botoak lotzen ninduten lokarrietatik askatu nintzen eta pertsona normala izatera heldu nintzen; preso politiko normala. Askatasunarekin batera gorputza ere beste era batera sentitzen hasi nintzen.

Sekulartze tramite horien berririk izan zuten, nonbait, Bizkai aldean, eta idatzi ere egin zuten:

*«Felipe Izagirre, sacerdote franciscano, condenado por propaganda a 10 años, llevaba tres en la cárcel de Zamora. Le han concedido la secularización. La solicitó porque se hizo sacerdote para evangelizar al Pueblo; y en la cárcel se le juntó a otros sacerdotes y, por ser sacerdote, se le impidió tratar con otros presos, con el Pueblo. Por lo cual le han trasladado a la cárcel de Jaén. Emociona el leer su solicitud de secularización por motivos netamente religiosos. Felipe, desde la cárcel de Jaén, estás más cerca de tu tierra, de tus padres, tus hermanos y amigos, porque "¿quién es mi madre y mis hermanos...?" ¿como dijo Jesús?»* (*Iglesia*, 1972).

Eta berehala jarri zuten martxan tratamendu berria. Jaenera, bigarren graduko kartzelara bidaliko nindutela erabaki zuten; oraingoan Elizarekin kontatu gabe, noski. Kondenatuta dauden presoek erabili ohi duten jantzia eman zidaten. Preso trajea alajaina! Eta esan ere esan zidaten biharamunean goi-

zean goiz Jaenera eramango nindutela, Madrilgo Carabanchel kartzela famatutik iragan ondoren.

Hurrengo egunean hor etorri ziren ibilgailu zelular batean zenbait preso –beste kartzela batzuetatik ekarriak–, eta haietako bati eskumuturretik lotu eta Madrilera Guardia Zibilaren fusilpean. Benetan momentu horretan sentitu nuen askatasun sentsazioa ez dut sekula sentitu. Agur esan nion Zamorako kartzelari. Agur han geratu ziren lagunei, eta preso politikoekin bat egin nuen, lehenik, Carabanchelen eta ondoren, Jaenen. Urrats horrekin, nire bizitzak ibilbide berri bat hartu zuen.

Agur, Zamora. Agur, Konkordatu Kartzela!



# JUAN MARI ZULAIKA: ZAMORA, KONKORDATUAREN ZULOA

Juan Mari Zulaika

## 1. Eibarrera, abade langile

Felipe Izagirre eta biok Eibarren kokatu ginen 1968ko urtarrilean (gure belaunaldian urte biribilik bada, bat hau), frantziskotar anaidi berria sortu eta abade langile gisara bizitzeko asmoz. Fraide biok, gure jokaeragatik hain ondo hartzen ez gintuen komentutik ihesi (batak euskararen alde jarduten zuelako, eta besteak ezker politika eremuan), aspaldiko ametsa betetzera langile mundura salto egin genuen. Neu fundizio zahar batean eta Felipe fresadore lez industrian. Hasieran familia arrunt batean apopilo, aurrera pisu bat alokatzeko asmotan, baina gertakizunek ez ziguten horretarako betarik eman.

Eibarko sindikalari eta borrokalari gehienekin lagun egin ginen. Beste askoren artean, Onaindia eta Jon Etxabe ezagutu genituen. Azken hori Zamoran ikusi genuen berriz.

## 2. Kuartelean egurra

Txabi Etxebarrietaren hilketaren kontrako ekintzetan (1968ko ekainean) manifestazioaren buru gindoazen. Eta

ohartu baino lehen, ondotxo ezagutzen gintuen *sekretak* heldu, lagun bioi bat-batera pistolaz burua zauritu, eta etxera bidali gintuen. Berehala Guardia Zibila etxera etorri eta gezurretan kuartelera eraman gintuen. Bertan, gau oso-osoan, armen kulataz, ukabilaz eta ostikoka joz, eman eta eman, batere atsedenik gabe, eduki gintuzten kuarteleko *txapeloker* denen amorru biziaren mende. Gerritik behera, erabat ubelduta gelditu ginen biok.

Gureak doako torturak izan ziren; ez gintuzten ezer aitortzera behartu, baina bai senperrak eman, mendeku hutsak eraginda. Abade bion gorputzen egoera errukarriaren argazki adierazgarriak Donostiako gotzainari eskura eman zizkioten Juan Mari Bandres eta Miguel Castells abokatuek, baina bai alferrik! Argazkiak galdu egin zituen Jacinto Argaia gotzainak.

Lehenengo aldiz, kuarteletik, Donostiako Komandantzia Militarreko epaile militarraren eskutik, ekainaren 23an, Martuteneko kartzelara eraman gintuzten, eta hurrengo egunean kaleratu. Berriro, uztailaren 17an sartu gintuzten Martutenen, oraingoan sarrerakoan beste edozein presori lez, ipurtzuloak miatuz, zegokigun Konkordatuaz asko akordatu gabe. Baina gu abade ginenez gero, sendategian aparte eduki gintuzten, gurekin zer egin erabaki bitartean.

Sei egunetara, uztailaren 23an, Zamorara garraiatu gintuzten, probintziako kartzela berri ustez estreinatu gabekora. Bertan aurkitu genuen Alberto Gabikagojeaskoa, Dueñas monasteriotik bezperan ekarri berria. Horra azkenik Francoren Gobernuak, Konkordatuaren arauak urratuz –hori bai, Elizaren onespenarekin– gogoko ez zituen abade kalapitatsuak giltzapean bahitzeko modua egin. Konkordatu Kartzela zabaldu zen hamarkada luzerako.



## 3. Kartzela eta Loiolako kuartelean epai militarra

Aldi hartan, epaiketarik ez zen egon, inongo agiririk ere ez. Espetxe Erakundeen egungo paperek diote kartzelatze haiek zirela «por causa N/C», hau da, «arrazoi ezagun gabeak». Garai hartan, berriz, zera aitortu ohi zen: *«por aplicación de la Ley de vagos y maleantes»*, hots, «Alferrei eta Gaizkileei buruzko Legea ezarriz».

Bigarrenez 1969ko apirilaren 30ean sartu gintuzten berriro Zamoran, beste hilabeterako, berriz ere, Felipe eta biok. Arrazoiak, aurreko berberak.

Hirugarrenez 1970eko maiatzaren 15ean sartu gintuzten Zamorako espetxean. Oraingoan sei hilabeteko zigorrarekin eta, behingoz, nire kasuan, epai baten ondorioz; eta ez edonolako epaia, epai militarra baizik. Loiolako Kuartel Militarreko Arma Ganberan, medaila anitzez horniturik militar mahaiburua batetik, eta, bestetik, Juan Mari Bandres eta Miguel Castells abokatu gazteak eta bi fraide auzipetuak. Ez Konkordatua soilik, arrazoimenaren marka gogorrenak ere apurtzeko prest zegoen Erregimeneko agintea. Eta zein zen, bada, halako epaiketa militar arranditsuaren arrazoi soila edo kausa: Txabi Etxeberrietaren aldeko manifestazioan parte hartzea baino ez.

Hiru urteko espetxealdia eskatu zuten, nahiz eta sei hilabetean gelditu. Horietatik lau bete genituen. Ni 1970eko irailaren 8an irten nintzen, laguna bertan utzirik, beste auzi baten zigorra betetzen.

## 4. Kartzela barruko bizitza

Neureak sartu-irten laburrak izan ziren. Lagunek esaten zidaten ea turismoa egitera nindoan edo. Azken egonaldian, Deustuko Unibertsitatean egiten ari nintzen Soziologia ikasketetako laugarrengo kurtsoko azterketak egitera animatu

nintzen, baina kartzelako zuzendaritzak debekatu egin zidan. Bai aukera ederra galdu. Ez nuen ikasketei berriz heltzeko aukerarik izango. Kartzelatzearen ondorioetako bat Soziologia karrera amaitu ez izana.

Liburuekiko zentsura hertsian ziharduen zuzendaritzak. Gogoan dut kasu bat: Herbehereetako Katekismo berria ez ziguten pasatzen laga. Zer esanik ez politikako, marxismoko edo antzeko liburuak, nahiz eta beste kartzeletan horietakoak ametitu.

Ez dakit nola, baina zentsurari liburu bitxi bat itzuri zitzaion: Henri Charrière-ren *Papillon*. Hura irakurriz otu zitzaidan irteerakoan lagunei ze mesede egin behar nien: lagun denek paper finean idatzitako komunikatu eta eskutitzak txokorra legez bildu eta ipurtzuloan atera kartzelatik. Otu eta egin, ez ordea arazorik gabe. Irteera uste baino gehiago luzatu zen, eta ni hormaren kontra jarri eta aguantatu ezinik. Noizbaiten irten nintzen, eta han joan nintzen Zamorako kafetegi ederrenera bizilagun arrotza kanporatzera.

Egun asko behar izan nituen korreo ugari hura banatzeko Bizkaiko zenbait auzotan zehar, atzetik zebilzkidan txakurrei ahal nuen moduan itzuri eginez. Pentsatzen dut, *Papillon* liburu horrek bere eragina izango zuela gerora lagunek kartzelatik ihes egiteko ekintza erabaki eta kasik bideratu zutenekoan.

Egongela txiki bat genuen. Han idatzi eta irakurtzen zen. Larunbat arratsaldeetan telebistako pelikula ikusi ahal genuen. Eskoletan ohiko ziren biko mahai ezagunak genituen jarleku. Jon Etxabe izan nuen mahaikide. *Farias* bana errez kontatu zizkidan Poliziak eginiko torturak. «Ipurdi masailetan emandakoak izan nizkian mingarrienak».

Janaria gutxi eta eskasa, eta behin eta berriz berdina. Txitxarro puskatxoak ez baziren, gorputz eta izter gabeko oilaskoen lepondo eta hegal pusketak. Ez genuen sukalderik, eta ez ziguten lagatzen kanpoan prestaturiko inolako janaririk pasatzen. Hestebeteak baino ez, eta horiek ere erabat txikituta,



txerrikia ez beste zerbait zekarren ikusteko. Horretan beste kartzeletako preso denak baino okerrago geunden; ezin genituen dastatu beste kartzeletara eraman ohi zizkien lapiko eta kazolakada ederrak.

## 5. Elkarbizitza

Neu den-denekin oso ondo moldatu nintzen. Han nengoela, hogeitik gora abade izatera heldu ginen, hamarretik zortzi euskaldunak. Umore ona, eta txantxetarako gogoa ugari izaten genuen. Inor oheko maindire tartean azukrea botatzera ausartzen bazen, hurrengo eskarmentu bereziarekin ordaintzen zitzaion, esate baterako, Calver hautsez pla-pla eginda posteari lotuta errenditu arte.

Kartzela osotik gutxien bisitatzen genuen txokoa sakristia zen, non gelditu baitziren betirako baztertuta mezatarako jantzi eta tresnak; albak, zinguluak, estolak, kalizak, eta abar. Logelan ematen genuen meza, horretarako gordea genuen ardo pitinarekin. Meza ondoren, itxurazko iskiluez desfilatzen genuen *Eusko Gudariak* abestuz. Gudariak gogoratzea izango zen, noski, desfile hark izan zezakeen zentzu bakarra, edo ohera aurretik hankak berotzea.

Eguneroko bizitzan bazen gauza bat nire onetik gehien ateratzen ninduena. Kartzela geuk garbitzen genuen. Taldeka banatu eta gela denak erratzez, urez eta baietaz pasatzen genituen. Lan horren kargudunak gure artean izendatzen ziren. Niri tokatzen zitzaidana, Lukax laguna, zuhurregia iruditzen zitzaidan, eta asaldatuz esaten nion. «Hi, zergatik laga behar diagu patena edo norberaren etxea baino garbiago kartzela zikin hau?».

## 6. Herbeherreetako eliz kontestatzaileari bisita

Lehenengo irtenaldian, Herbehereetan apaiz kontestatzaileek antolatutako jardunaldietara bidali ninduen presoen ordezkari lez Gogor abade taldeak. Bidaia Lezo izeneko gudari ohi famatuak gidaturiko auto mantso batean egin genuen. Batzar kontestatzaileak aukera zabala eman zigun euskal abadeen, batez ere kartzelatuen, berri emateko. Kosta egiten zitzaien hemengo egoera zital bortitza konprenitzea, kuarteletan zigortu eta kartzelatu izana. Francorena neurri batean ezaguna zuten, baina Elizak amore emateak erabat eskandalizatuta zeuzkan. Euren borrokatik geurera aldea zegoen. Eurek zelibatuaren kontra ari ziren. Gu, berriz, gizarte osoaren eskubide elementalengatik eta herri baten askatasunagatik ari ginen.

Argi agertu genuen Euskal Herriko apaizgo gaztea zenbateraino inplikatua zegoen Diktaduraren kontrako borrokan, era askotako abangoardiatan sartuta, langilearekikoan nahiz abertzalekoan. Euskal Herri Langile askatua genuen gure ikur, gaztelaniaz *«Pueblo Trabajador Vasco»*.

## 7. Sinesmenarekiko haustura

Kartzelako egun amaigabeetan Elizarekiko eta erlijioarekiko kezka handiak bizi genituen edo nituen nik, behintzat, eta gogoz irakurri eta hausnartu nituen gaiari buruz eskuratu ahal izan nituen liburuak: *Teología de la Liberación*, baita teologo protestante baten *La Muerte de Dios* ere. Ondo premiazko hausnarketak nireak! Hamahiru urte luzetan elizgizon izatera eginiko karreran hornitu edo jantzitako buru eta barruak irauli egin behar nituen.

Lan horretan, kartzelako egoerak eragina zuen, noski. Kartzelan hainbeste abade lagun jator eta borrokalari eliz *artzainen* inongo babesik gabe ikusteak adierazpen argiak zekarzkion buruari. Horrela, lehenengoz eta behin, Eliza bera, haren izaera eta esanahia, oso-osoak, behingoz bota nituen pikutara, sugeak larru zaharrarekin egin ohi duen antzera. Ondoren, Elizarekiko fedearen atzetik, erlijioaganako sinesteak ere hantxe hasi ziren jausten, desegiten.

## 8. Kartzelatzearen kalteak eta mesedeak

Kartzelaren kalteak zenbatzea ez da erraza. Egunak eta orduak zenbatu ahal dira, ordea. Sei hilabete, hau da, 180 egun, hau da, 4.320 ordu nire bizitzatik lapurtuak. Ordu horiek denak banan-banan eta konta ahala bizi behar izana. Soziologia karrera amaitu gabe moztu izana eta bertako aginteen zentsura zentzugabea eta tratu gaiztoak jasana, beste kalte bi. Elizaren gezurra, isiltasuna, ardurarik eza eta ustelkeria ere, kalteak. Komunikabideen erabateko *off* maltzurra, kaltea. Felipe lagunarengandik apartatu izana, kaltea.

Mesedeak, berriz, bertan egindako lagunak eta bizi izandako esperientzia. Bizkaiko Gogor abade taldearekin harreman estua, kide izaterainokoa, hori ere mesedea. Elizatik eta erlijiotik behingoz eta betirako alde egina, mesedea. Errepresioaren aurpegia pertsonalki jasan eta ezagutu izana, mesedea. Borrokarako heldutasuna jaso izana, mesedea.

## 9. Bilboko borroka giroan murgil

Hirugarren aldian kartzelatik bakarrik irten nintzen, Felipe lagun mina bertan lagata. Harrezkero, ez ginen gehiago elkarrekin bizi izango. Eibarrera agertzea debekaturik genuen. Lehenengo irtenaldian, berak Gipuzkoara egin zuen eta nik Bilbora.

Bilbon beste bi fraide-abade kiderekin anaidi berria sortu genuen, Errekalde auzo langilean pisu bat alokaturik.

Abade langile lez, lanetik bizi ginen. Frantziskotargo eta eliz diziplina espresuki apurtu ez arren, gure eliztar jokabidea *Kristau Komunitateak* zeritzatenen ildotik zuzendu genuen, nik batik bat. Ohiko liturgia erako mezarik ez genuen ematen, ez eliza ofizialik zapaltzen. Afari moduko elkarteetan ospatzen genituen gure mezak, ogia eta ardoa mahai arruntaren inguruan baturiko lagunarte kristauari eskainiz.

Aspalditik HOACeko gizon eta emakumeekin harreman estua izan nuen beti. Euren kontziliokidea zen Ollargango parroko Felix Jimenezekin Avilako jardunaldietan egona nengoen. Estimatzen nituen eta ez nuen inoiz adiskidetasuna galdu. Klaseen arteko borrokarako grinak eragiten ninduen, ez, ordea, abertzaletasunaren kaltean. Uztarri bereko begiak nituen sentimendu biak.

Deustuan Soziologia ikaskuntzara apuntatu nintzen. Diziplina hori sasoi hartan iraultzailetzat jotzen genuen, eta gaztedi borrokalarienetakoa inguratzen zen karrera horretara. Manifestazioetan sarri hartzen genuen parte, eta sua erabili ere bai, estreinako aldiz. Ikasketa ofizialetik gain, talde handi bat osatu genuen marxismoa sakontzeko gogoak bultzatuta. Gutariko zenbaitek ETArekin kontaktuak zituen eta bat baino gehiago etakide egin ere bai.

Ondarroarekin lotura handia nuen. Eibarren abade langile ginenez geroztik, Ondarroako portuan langile legez ziharduen Imanol Oruemazaga abadearekin harremana genuen. Harrezkero, urteetan bertara hurbiltzen nintzen asteburuetan, hitzaldiak ematera. Zapatu arratsaldeetan emakumezkoei, etxe barruetan, eta igande goizetan mendian, neska-mutil gazteei. Arrain poltsa ederrarekin itzultzen nintzen Errekaldeko anaidira.

Gogoratzekoa da herri honetan, 1968an, neskek gauzatu zuten ekintza gogoangarria, gau osoan kanpai hotsez herria asaldatu zutenekoa. Harrezkero, elizara joateari laga egin zion herriko gehiengo batek. Hortaz, ez da harritzekoa ezkontzak Elizatik at ospatzen hastea. Neuk ere lau bat ezkontza egin



nituen era horretan, Eliza ofizialetik kanpo. Ezkongaiei sinesmenarekiko uko-agiria exijitzeraino ausartzen zen Markinako jueza.

Goian agertu bezala, Bilbotik beste bitan bisitatu behar izan nuen Zamorako kartzela. Azkenera, nire pentsaeraren aldaketak frantziskotar anaidia uztera behartu ninduen. Elizarekiko eta frantziskotar izaerarekiko erabateko haustura gertatu zen. Errekaldeko langile auzoa laga eta Algortako ikastolan hasi nintzen, bertako irakasleekin bizitzera jarrita.

Kurtsoa bete baino lehen, ezkutatu beharra izan nuen, Polizia atzetik nuelako, eta irakasle lana galdu nuen. Ondoren, bi urtetako klandestinitatea, muga pasatu gabe, erakundeak agindutako ezkutuko lanetan.

Eta gero gerokoak. Alegia, zibilezko arauekin ezkondu, lan berriari heldu, Informatikako komertzial legez, Iralako auzora hurbildu, Auzo Elkartean buru-belarri luzaroan jardun, LKI alderdian parte hartu, eta abar. Urteetan, amnistia lortu arte, ezin atera izan nuen lanerako behar-beharrezkoa nuen gidatzeko baimena, bizkarrean kartzelatuaren curriculuma neramalako, hau da, *«antecedentes penales»* zeritzona.

## IÑAKI AURTENETXE:
## KARGUTU NINTZEN NONDIK IHES EGIN NAHI ZUTEN

Iñaki Aurtenetxe

NI, GOGOR SORTZEAR ZEGOEN GARAI HARTAN, Sodupeko San Bizente parrokian apaiz laguntzaile eta errient nengoen. Bada, 1967ko abuztuaren 10ean, San Lorenzo martiriaren jaiegunean, neure burua jarraian datorren oharra egitera behartua ikusi nuen: «Aurrerantzean, ez dago ezelango beharrik Banda Munizipalak Sagara aldian inolako doinurik jo dezan –*Espainiako himno nazionala* jo ohi zuten–, une hori guztiz berezia baita liturgian; horixe gogoratzen digute Erromatik datozkigun dokumentuek».

Bizkaiko Gobernadore Zibilak isuna ezarri zidan, ez naiz oroitzen zenbatekoa, 25.000 pezetatakoa ala 50.000koa. Jarraian isun gehiago ere ezarri zizkidaten (bizpahiru aldiz), hainbat arazorengatik, gero errege dekretuen bidez deuseztatu bazituzten ere.

Isun horien oihartzuna herri osora hedatu zen, baita Mexikoraino ere. Juan Manuel Landa laguna eta biok joan ginen Gobernu Zibilera, geure erantzuna aurkeztu nahian, baina auzi guztia bere lehenean gelditu zen. Probikarioak (Derioko seminarioan teologia morala irakasten zigun Bilboko San Bizenteko apaiza bera) erantzun hori erakuts niezaion eskatu zidan. Irakurtzean, ea nork idatzia zen galdetu zidan. Harrituta gizona neuk egina izateaz!

Haren ostean, 1968ko 29an edo 30an, ez nago ziur, Poliziaren zenbait inspektore aurkeztu ziren Sodupen, neu kartzelara preso eramateko asmoz. Dei egin nien hango beste apaizei, Juan Manuel Landa eta Anton Garziari, gertatzen zenaz jakitun jartzeko. Indautxuko komisariara eraman ninduten; leotzean sartu, eta hantxe konturatu nintzen zer gertatzen zitzaigun. Sei apaiz ginen giltzapeturik.

Eraman Basauriko kartzelara eta geuretzako atonduriko ziegetan instalatu gintuzten. Dutxatzerakoan hitz egiten genuen elkarrekin. Agustin Ibarrola margolaria ere bazegoen orduan han preso. Bazen Santutxuko kartzelari bat, neurekin hitz egiteko bere despatxura atera ninduena, San Frantziskotxu parrokiatik ezagutzen baikinen. Heldu Loiolako San Ignazioren jaia, eta hainbat aldiz jarri zuten San Ignazioren martxa. Zertarako eta geu dataz kontura gintezen. Jaian parte har genezala nahi zuten.

Heldu zen beste leku batera aldatuko gintuzten eguna, nora zen esan gabe. Hainbat poliziak, dozena bat inguru, hiru autotan eraman gintuzten. Ni neu, Periko Solabarriarekin batera, eta beste lau –Txomin Artetxe, Jose Mari Madariaga, Pedro Berrioategortua eta Imanol Oruemazaga– Zamorako espetxera aldatu gintuzten, Bizkaiko gobernadore zibilak ezarritako isunengatik. Hantxe zeuden jada Alberto Gabikagojeaskoa eta bi fraide, Felipe Izagirre eta Juan Mari Zulaika. Gurea aparteko pabiloia zen. Goian bageneukan egongela bat, agian. Ilunabarrean, abesti erlijiosoak. Konpleten zati bat kantatzean, gainerako presoak ere kargutzen ziren apaiz edo fraide behar genuela izan. Geure folkloreko beste abesti batzuei ere ekiten genien.

Bazen kartzela-kapilau bat, don Clemenciano zeritzolakoan nago, gurekin hitz egin nahian ziharduena. Behin batez diosala egin nahi izan zigun. Zenbait estola ekarri zizkigun; bost zuri, bost gorri eta bost orlegi. Ez zaizue gaitz izango zein trufa sortu zen asmatzea!



Ez geneukan inolako orientabiderik kartzelan. Behin zuzendariari eskutitza idaztea otu zitzaigun. Gutun bakarra izan zen, guztiok batera idatzia. Ez zigun kasurik egin, bakoitzak berea idatzi behar genuela eta. Berriro ere eskutitz bakarra egitea erabaki genuen, eta neu aukeratu ninduten idazteko. Eskutitz bakarra zenaren ale bana bidali genion apaizok, nork bere sinadurarekin. Eta horrelaxe egin genuen beste gehiagotan ere.

Gogoan dut, bestalde, bazela zaindari bat, zeinaren semea, zortziren bat urtekoa, kamioi batek azpian hartuta hil baitzen. Gurekin harremanik bazuen, eta harekin zer edo zer hitz egin ahal izaten genuen.

Kartzelako beste oroitzapenik ia ez dut. Hori bai, sekulakoan gozatu genuen lagunartea. Sartu eta hilabetera, kondena osoa beterik, 1968ko abuztuaren 30ean, libre utzi ninduten. Libre nintzela, jakin nuenean urte askotarako kondena zeukan eta Zamoran jarraitzen zuen talde batek tunelean zehar ihesi egin nahi zuela, argi ikusi nuen nondik nahi izan zuten alde egin...

IMANOL ORUEMAZAGA:

ONDARROATIK ZAMORAKO KARTZELARA

Imanol Oruemazaga

NIK HIRU URTEZ SEGIDAN EZAGUTU NUEN Zamorako kartzela, 1968., 1969. eta 1970. urteetan.

## 1. 1968. urteko egonaldia

1968. urtean, abuztuko hila pasatu nuen kartzelan. Gobernari zibilak jarritako 25.000 pezetako isuna ez ordaintzearren eraman ninduten kartzelara. Egun berean, eta arrazoi berdinagatik, Bizkaiko beste abade batzuk ere eraman zituzten.

Isuna jartzeko *arrazoia* aurreko urtean guardia zibilen egunean Ondarroako parrokiako aldare nagusian guardia zibilen mezetarako jarri zuten Pilareko Ama Birjinaren irudiaren ondoan zeuden bi bandera espainolak estaltzea izan zen. Egun horretan, iluntzean, herritar baten hiletak zirela-eta elizan sartzean, ohartu nintzen ez ohiko bi bandera haietaz. Don Pedro parrokoa ohartazi nuen. Baina ez zidan kasurik ere egin. Aldare nagusian jarraitzen zuten bi banderok. Orduan Benito sakristauari agindu nion bi bandera haiek estaltzeko. Hark nire agindua bete egin zuen. Handik aldi batera iritsi zitzaidan gobernari zibilak ezarritako 25.000 pezetako isuna.



Imanol Oruemazaga garaiko argazkian

Hilabete hura oporraldia izan zen niretzat. Batetik, denok genekien zenbat luzatuko zen kartzelako egonaldia. Bestetik, lagun artean, giro alai eta anaikorrean. Gogoan daukat Xabier Amuriza Zamorako espetxera iritsi zen goiza. Patioan geunden *pilotan* jokatzen (Zamorako espetxean jokatzen genuen *pilota joko* bereziaren patentea egin ote du norbaitek?). Han agertu zen gure Xabier, patiora ematen zuen pasilloan, *gentleman* bat bezala, bere *clergyman* eta guzti. Ezkontza baten zegoela, Poliziak atrapatu eta Zamorako kartzelan jarri zuen.

## 2. 1969. urteko egonaldia

1969. urtekoa beste kontu bat izan zen. Urtarrilaren azken egunetan Salbuespen Egoera aldarrikatu zuten Bizkaian Madrilgo agintari frankistek. Ezkerraldea (Barakaldo) eta herri abertzale bat (Ondarroa) aukeratu zuen Poliziak bere sareak botatzeko.



Herri bi horietan atxilotutakoen artean, abade bi, Periko eta Imanol. Jokaldi biribila!

Ez noa aipatzera hemen Indautxuko poliziaren jefaturan geundela, J. M. Cirarda gotzainarekin izan genituen tirabirak. Azkenean, Perikok eta biok ez genuenez onartzen kartzela ordez komentura joatea, Bilboko Gotzaindegi aurrean aurkitu ginen gau iluna zela.

Bakoitza geure etxera etorri ginen biok. Ni neu egun gutxira atxilotu ninduten herriko guardia zibilek, euren kuartelaren aurretik igarotzean, eta berehala Zamorako espetxera eraman.

Zamorako espetxea oso ezberdina aurkitu nuen, aurreko urtekoarekin alderatuz. Eraikuntza bera, tokia ere bera. Baina hotz handia! Lau preso bakarrik: Alberto, Mikel, Lukax eta aita Botey (Katalana). Hori bai, a nolako elkartasuna eta anaitasuna gure artean! Ez zaizkit inoiz ahaztuko bostok euskaraz ematen genituen meza haiek. Eta Botey bera eskuak lurrean jarri eta hankak goian zituela yoga egiten!

Baina a zelako aldaketa presondegiko zaintzaileen aldetik! Datu bat azalduko dut soilik. Aita Botey margolari ona zen. Egun batean, ez naiz gogoratzen zer dela-eta, Che Guevararen irudia margotu zuen arbelean. Irudi hutsa. Gure zaintzailea ohartu eta espetxeko zuzendariari jakinarazi zion. Berehala iritsi zen zuzendariaren agindua: *«Eso que han puesto en el tablero, bórrenlo inmediatamente»*. Bai ezabatu ere! Zer erremedio!

Errepresioaren beste oroitzapen pertsonal bat ere gehituko dut. 1969ko Aste Santuan bisitatzera etorri zitzaizkidan Jon nire anaia eta Miren haren emaztea, Jon eta Josu semetxo biekin. Bi haiek ume txikiak ziren. Bisita tokira sartu aurretik, zaintzaileak ohartarazi ninduen euskaraz hitz bat egiten bagenuen, berehala moztuko zigula bisita. Nire etxekoengana hurbildu nintzenean, berehala jakinarazi nien zaintzailearen mehatxu-oharra.

Are gehiago, zaintzailea bera gure muturren aurrean jarri zen (bisita-toki hark tarte bat zuen, bi sarerekin babestua), adi ea noiz euskaraz hitz egiten hasten ginen.

Bisita hura benetako zigorra izan zen nire etxekoentzat eta niretzat ere. Pentsa! Gure artean, etxean, sekula santan gaztelaniaz hitz bat ere ez genuen egin. Nire loba txiki haiek ere erabat moztuta zeuden, gaztelaniarik jakin ere ez baitzekiten. Gainera, sare haiek euren eta nire artean... Hain egoera desegokian aurkitu ginen danok, non bisitaldia bertan behera geuk utzi genuen, amorru handiz.

Eskerrak biharamun goizean berriz etorri zirenean nire etxekoak, beste zaintzaile bat zegoela! Hark, egoeraz ohartu-rik, bisitaldian euskaraz hitz egiten utzi zigun. Are gehiago, bisita-tokian sartu ere ez zen egin.

Nire espetxeratzea TOPek 1969ko maiatzean epaitu ninduenean amaitu zen. Izan ere *«asociación ilícita y propaganda ilegal»* delitua leporatu zidaten. Arrazoia: Poliziak nire etxea arakatu zuenean, *Kili-Kili* aldizkariaren ez dakit zenbat ale aurkitu zuen eta aldizkari horretan agertzen zen *«un mapa de marcado matiz sectario y separatista»*. Zer zen mapa hori? Bada, Euskal Herri osoko maparen zirriborro bat. Uda hartan *Kili-Kili* aldizkariak bere ume irakurleekin egin nahi zuen txangoaren ibilbidea, alegia!

Epaiketa egin eta biharamunean bertan TOPek berak kalera atera ninduen.

## 3. 1970. urteko egonaldia

TOPek sei hilabeteko espetxe zigorra ezarri zidan, goian aipatu dudan delituagatik. Zigorra konplitzeko geratzen zitzaizkidan hilabeteak betetzera joan nintzen.

Zamorako abadeen espetxea abadez beteta zegoen. Giroa ere halakoxea.



Ihesaldia prestatzen buru-belarri murgilduta bizi ginen. Ordurako *Osaba Joxe*ri esker kanpokoekin ere libreki hitz egitea posible zen. A nolako poza *Osaba Joxe*rekin hitz egiten zen gauetan! (*Osaba Joxe*ren bidez hitz egiteko Duero ibaiaren beste aldera egindako bidaien berri zehatza Periko Berriok ematen du). Neuk ere lagundu nion behin edo behin. Horietako batean Salamancara lo egitera joan beharrean aurkitu ginen, espetxeko fokuek egin zituzten mugimenduak zirela-eta. *Falsa alarma* gertatu zen. Baina...

Egonaldi honen ondoren sartu ziren espetxean zuloa egiteko behar ziren tresnak. Nire herriko arrain-kontserbategiko langile batek edo bestek badu horren berri zehatzagorik. Eurok zarratzen zituzten latak arrain-kontserbategiko makinan, barruan arraina barik, zuloa egiteko tresnak zituztela. Lata horiek normaltasunez sartu ziren Zamorako espetxean. Tresna arrunt eta xume hauekin nolako *zuloa* egin zuten Zamorako *satorrek!* Ingeniaritza sariak lortu izan dituzte Zamorako zuloak baino merezimendu gutxiagorekin! Bai horixe!

Bada, 1970. urteko egonaldi honen beste oroitzapen bat ere badaukat, inoiz ahaztuko ez dudana. Madrilgo Gobernuak egindako saioa abade hutsei indultua emateko eta honen kontra Zamorako abadeok hartutako jarrera irmoa. Alarma biztu zen katalandar apaiz talde bat Zamorako espetxetik bat-batean, goizeko orduetan, atera zutenean. Izan ere, Zamorako abadeen espetxeak min handia egiten zion Espainiako Gobernu *katolikoari* Europa osoan, Alemaniako aldizkari batek (ik. QUICK, 1970-X-18) Zamorako espetxeaz egin zuen erreportaje baten ondorioz.

Zamorako espetxean gelditu ziren euskal apaizak ere asaldatu ziren, eurokin ere Gobernuak berdin ez ote zuen jokatuko beldurrez. Eta balizko indultua apaizei soilik emateearen kontrako jarrera adierazteko, posible zen Elizako agintariei gutunak idazteari ekin zitzaion. Nik ere nire hondar garaua eman nuen. Oraindik gordeta daukat Kasimiro Morcillo gotzainak, garai hartan Madrilgo gotzain eta Espainiako




Zamorako kartzelari buruz erreportajea egin zuen Alemaniako *Quick* aldizkariak

gotzainen konferentziako buruak, nire gutun bati erantzunez igorri zidan gutuna.

Sei hilabeteko nire espetxe zigorra osorik konplituta, 1970eko abuztuaren 10ean aske utzi ninduten.

Zamorako espetxeko bizitzaz baditut beste oroitzapen bi, ahaztezinak. Bata, gauero oheratu aurretik, gure logelan *Eusko Gudariak* abestuz egiten genuen desfilea, Nikola handia buruzagi genuela! (Zehaztasun gehiago Martin Orbek). Bestea, Euskal Herritik jasotzen genuen laguntza paregabea. Zornotza txapeldun!



PEDRO BERRIOATEGORTUA:

NIRE ZAMORALDI LABURRAK

Pedro Berrioategortua

BI ALDIZ IZAN NINTZEN BARRURATUA Konkordatu Kartzela horretan, Zamorakoan. Lehendabizi, isunagatik, 1968ko abuztuan. Artean apaiz nengoen Zornotzan. Isunak Txabi Etxebarrietaren heriotzaren ondorengoekin du zerikusia.

Jakina denez, Txabi Etxebarrietari Tolosa inguruko Benta Haundi izeneko lekuan eman zioten heriotza, 1968ko ekainaren 7an. Horren ostean, zenbait apaizek gure elizetan haren aldeko mezak ematea erabaki genuen.

Bada, Bizkaiko gobernadore zibilak, guardia zibilen indarrez, herritarrei Txabi Etxebarrietaren aldeko mezetara joatea eragotzi ondoren, apaiz meza-emaileoi isuna jarri zigun. Urrunetik ere nabari zen gure kezka nagusia ez zela, inolaz ere, isun haiek, ez eta aurreragotik jarriak ere, ordaintzea. Horretarako, Pablo Gurpide gotzainaren oniritzia ere bazuten, kartzelako espedienteak dioenez. Han sartu gintuzten eguna 1968ko abuztuaren 2a izan zen.

Hilabete eta erdiko egonaldia kartzelan, egia esan, ederra gertatu zitzaidala aitortzea ezinbesteko zait, guztion tarteko adiskidetasun handiak girotu baitzuen. Bestalde, kartzela barruko bizitza ezezaguna zitzaigun, funtzionarioekin ordu oro izan beharreko harremanak batez ere. Esperientzia berri horretatik, uniformedun haiei dagokienez atera ahal izan nuen

ondorio bakarra da, baten batzuk salbu, fidatu ezin zaitezkeen jendearen zerrenda horretan gehitu beharrekoak zirela gehienak.

Beroa egundokoa egiten zuen egunez, eta gauetako sargoriak ere halakoak ziren. Horma garaiak eta espazio laburrak zituen patio txiki bat zen gure aisialdietarako irteera bakarra, zeinetan eguzkiak udan bertikalki jotzen zuen eta piztutako karobi zulo bilakatzen zen. Baina, negu aldean alderantziz gertatuko zela ziostan nire baserritar senak, eguzkiak zeharretara joko zuela kartzela eta patio hartan, ezertariko eguzkirik ez zela agertuko Gaztelako negu gorri luzean. Lagunek tronpa joz hartu zuten iragarpen hori, berriz, udazkenak egiaztatu zuen, eta agerian jarri zen Madrilen eta Vatikanoaren kartzela hark barnean ezkutatzen zuen krudelkeria klimatikoa.

Lau urte geroago, 1972ko martxoan, berriz ere Zamorako espetxean nintzen, Ordena Publikoko Auzitegiak (TOP) zigortua. Herriko alkateari eta zinegotziei eskutitz bana, euskaraz eta gazteleraz. Eskutitzean nioena? «Zuek zarien ezkero, ez herriaren ordezkoak, giza eskubideak, bai legez eta bai egitez, ukatzen dituen aginte ezarriarenak baizik, maitasun-eza daroazue maitasuna –agape– den mezatara, bada, ohi duzuen lez agintari elkartean mezatara ez etortzeko eskatzen dizuet».

«*Desacato*» eta «*propaganda ilegal*» delituak leporatu eta «*un año de prisión y multa de diez mil pesetas por cada delito*» ezarri zizkidaten.

Behin kartzelan, ezusteko galanta hartu nuen. Gaixotegira bidali ninduen medikuak. «*Debe ser dado de alta en enfermería dándosele el racionado especial de la enfermería*» ebatzi zuen Alvarez Terrero kartzelako osagileak, lehenengo egunean gaizki irten zen ebakuntza baten ondorenak eta baskularretako arazo larri bat aztertu ondoren. Eta hara nire lehenengo ezusteko garratza, lagunekin, besteak beste, logela handian gauak igaro nintzakeela pentsatzeak bakarrik pertsona zoriontsu bihurtzen baininduen. Eta okerrago oraindik esan zidatenean gaixotegian bizilagun izango nuela odolezko



delituz zigortua zegoen Jose fraidea. Ganibeta erabiltzen trebea omen zen Jose hori, gazte baten kaltetan frogatu ahal izan zuenez. Eta nire kartzelakideei egokitu zitzaien txantxetarako txanda, lehenbiziko afariaren ondoren, galdetu nienean, olgetan benetan, ea sukaldeko ganibet handia bere arauzko tokian jarria zegoen.

Zortzi egunen buruan, zigorraren kitapenaren berri eman zidatenean, nire urte biko epaiak erdiaren erdira jo zuela jakin nuen. «*Por cada delito*» zelako hura saihestuz laburtu zidaten kondena. Kontuan delitu bakar bat hartu zuten eta 365 egunetan utzi zuten nire zigorra. Horrez gain, 71-9-23 dekretuak zigorraren erdia indultatzen zuenez, 182 egun ziren kartzelaturik bete behar nituenak. Baina ez, ez nien murriztapen haren zergatiagatik galdetu. «Bego bere horretan», pentsatu nuen, badaezpada ere. Gaur, ostera, kartzelako medikuaren agiriak bere eragina izan zezakeelakoan nago, kode zaharra zela medio. Agian, ez zuten nahi bat-bateko osasun larrialdiren bat gertatzea.

Bazkarietan ematen zidaten jaki puska berezia («*el racionado especial de la enfermería*», erdara ederrean), nire gaixotegiko lagunari, Jose fraideari uzten nion, horrela gure eguneroko harremanak samurtzeko asmoarekin. Bera ere joko horretan sartua eta ados zegoelakoan nago, gainera. Inolaz ere objektiboki samurtu ezina, ostera, presondegia bera zen. Norbere kontzientziaren eta borondatearen arabera jokatzeko eskubideez desjabeturik, herri giro eta talde ekintzaileengandik erabat urrunduta, lau horma tartean loturik biziaraztea zen zeharo aldaezina. Gizaseme talde berezi bat, prestakuntza onez jantzia eta gizabide gaietan arretatsua zakar zigortzen lau urte zeramatzan jadanik Zamorako kartzelak. «Pertsona herriarekiko harremanetatik urruntzea gogorra duk, gero», pentsatzen nuen neurekiko sarritan, pena handiz. Nolanahi ere, Nazional Katolizismoaren aurkariak isilaraztea helburu bazuen Zamorako presondegiak, helburuen eta bitartekoen

auzia gogora ekartzeko eta ondorioak ateratzeko balio beharko digu, behintzat, zentzugabekeria horrek.

Azkenik, esan, espetxe politiko-eklesiastiko hark ahalbidetu zidala preso talde heldu baten ezagutza, irizpide orekatuak nortasun handiz mantentzen zituena, kartzela gorabehera ere. Garaia ere berezia baitzen oso, Euskal Herriko ezkerraren barruan iritzi aniztasunak eta joera politikoen ezberdintasunak indartuz zihoazen eta gure artean ere horren guztiaren eragina nabaritzen genuen, eten ideologikoak gauzatzeraino batzuetan. Nik neuk bezala, gehienek nork bere aukeraketa egina zutela sumatzen nuen, inguruan aditzen nuenaren argitara. Aldi berean, ostera, argi zegoen herriarekiko kezka nagusietan guztiok gogaide ginela, Euskal Herria erraietaraino sartua baikenuen. Eta adi, ahaztu ezinezko egia baita, presondegietako preso gehienek bezala, gutariko bakoitzak ere indarra baino ahulezia sarriagotan susmatzen genuen, eta indarrak elkarrengandik banandu gintzakeen bitartean, ahuleziak, ostera, elkartzea lortzen zuen. Eta ahulak ginela onartzen genuen heinean, presoen elkarte kutsua eransten zitzaigun eta beharrezko egiten edozertarako gertu sentitzea, lagunartean lanean aritzea. Zuloa eta sutea horren adibide.



## PERIKO SOLABARRIA:
## TRIANOKO MEATZEETATIK ZAMORARA

Periko Solabarria

PEDRO SOLABARRIA BIZKAIKO PORTUGALETEN jaio zen, 1930. urteko urtarrilaren 27an. Mundu guztiak *Periko* gisa ezagutzen duena ia mito bat izan da Ibar Ezker guztian, eta gero Herri Batasunako hautetsi lez entzuteko zortea izan duten guztientzat. Bera izan zen inguru hauetako lehen apaiz langilea, ertzeraino entregatua. Langile borrokan, eguneroko ekinean nahiz greba eta manifestazioetan, Periko aurrenen ibiliko zen. ETAren sorrera eta bilakaeraren lekuko hurbila izan zen inguru hartan. Demokrazia garaian Euskal Herrian izan daitezkeen kargu politiko guztiak izan ditu.

Hauteskunde sindikaletan aurkeztu den guztian ordezkari irten dela eta Herri Batasuneko Mahai Nazionalekoa ere bazela jorik, inoiz bospasei kargu batera eraman izan ditu.

(...)

**Gogoan daukat, gu apaizgaiak ginela, apaiz langileen sinboloa zinela, ertzeraino entregatua. Zuk zeuk nabari al zenuen apartekotasun hori?**

Bai, bai. Nik ikusten nuen Elizaren biziera eta nirea, baita jendearen harrera ere. Kontraste handiegia zen hura, ez ikusteko.

**Eta beste apaizek nola hartzen zintuzten?**

Isildu egiten nintzen. Oraindik banituen neure gauzak, konfesatu eta abar, eta eurak ere berdin: «O! Hori Periko duk!» eta hala. Gizalegez ondo konpontzen nintzen, baina Arboledan haiekin batera bizi nintzenean, haiek predikatu ondoren, gero nik dena ezberdin egiten nuen, eta egundoko nahastea sortzen zen. Haien mezetan eskatu egiten zen, nireetan ez. Konfesioan berdin, nik *Agurmaria* bat eta arineketan bidaltzen nituen.

**Baina nolabaiteko errituari eta itxurari eusten zenion, antza.**

Bai, bai. Hamabi urtetan meza, sermoi eta holakoei eutsi nien. Oraindik ez zen konpromiso politiko-soziala hasi, Barakaldora jaitsi arte. Han goian, Trianon eta Las Calizasen, jendearengatik sakrifikatzen, lehertzen zen morroi bat nintzen, baina apaiz ikuspegitik betiere.

**Aszetika gehigarri eta guzti?**

Noski. Urteak egin nituen ogi eta olio hutsa jaten.

**Urteak?**

Barakaldora jatsi eta gero ere, ostatuko andre batekin nengoen, alarguna eta apaiz baten ama bera, eta neuretzat gordetzen nuen zerbait ez beste guztia hari ematen nion, eta eguerdian ogia eta olioa bazkaltzen nuen eta gauean ere berriz horixe.

**Esnerik eta bestelakorik...**

Ez, ez, ez! Besterik ezertxo ere ez.

**Eta fisikoki ondo?**

Bai, bai. Astakeria zen, baina ondo eta sendo nenbilen.

**Noiz eta zergatik utzi zenuen dieta hori?**

Mutil talde batekin bizitzen hasi nintzenean. Nik bestela hura guztia honako logika soilez egiten nuen: jendea nola, ni hala biziko naiz. Jendea txaboletan? Ba, nik doi-doia. Gaizkien bizi zenaren antzera bizi nahi nuen. Jendeak komunik ez zeukala? Ba, nik ere ez. Zuhaiztira joan, sotana jaso, galtzak jaitsi eta aire. Halaxe egin nituen zazpi urte.



**Zer lan egiten zenuen penitentzia horietaz gainera?**

Denetik. Auzoan falta zen eta nik egin nezakeen dena, albaitari laneraino. Behin behi bati injekzioa sartu eta handitzen hasi zen. «O, –pentsatu nuen–. Hau akabatu diat!». Medikurik ez praktikanterik hara igotzen ez zenez, ahal zena egiten nuen, botika eta guzti, eta dena doan noski. Baina nire lan nagusia eskolak ematea zen, egunero, jai eta aste, hango eskolatxo batean. Maistra adintsu samarra zen, eta ez zen etortzen.

(...)

**Noiz jabetu zinen ETAren existentziaz?**

Langile Frontea sortu zenean. Gure etxezulo hartan ekintzaile asko biltzen ziren: Unanue, David Morin, Nicolas Redondo, Ibarrola anaiak, batez ere pintorearen anaia. Hantxe ezkutuan biltzen ziren, eta Txabi Etxebarrieta izeneko bat ere etortzen zen, Langile Frontea sortzeko.

**Aurretik, egunkari, pintaketa eta abar, ez al zenuen ETAren berri sumatu?**

Bai, bai! Eta poztu egiten nintzen, sintonia osoa baineukan. «Egurra! Gogor! –pentsatzen nuen–. Gehiago eta hobeto». Dena abusu garbia ikusten nuen, Polizia eta gainerako guztia. Beraz, oso laket zitzaidan norbait gogor jotzen hasia zela jakitea, baina urrun samar ikusten nuen, Txabi Etxebarrieta etortzen hasi arte.

**ETAko ekintzaile gisa etortzen al zen? Agian armaturik ere bai?**

Ez, ez. Holakorik ez nuen imajinatzen ere. Langile Batzordeak, ikuspegi abertzaletik, nolakoak izan behar zuen azaltzera agertu zen. Mutil argal samarra zen, ez luzea, argia. Igartzen zitzaion bazekiena, atsegina zen, baina hitz gutxi egiten zuen. Gainera, ni ez nintzen eurekin biltzen. Nire lana zaintzea zen, ezer gerta baledi.

**Baina batzarretan egon ez arren, antzemango zenuen zer jende zebilen.**

Batzuk bai, baina ez denak. Gure etxetik zein jende mota pasatzen zen kontatzerik ez dago. Gero prentsatik jakiten

nuen ETAkoak jotzen ari zirela. «Hau popa-haizean zihoak!», esaten nuen neurekiko. Gainera, han denak pozten ziren: gorriak, zuriak, beltzak. Inork ez zuen bainarik jartzen. Pixka bat komunistatxo gailen batzuek esanez: «Bai, baina horrek errepresio gehiago ekarriko ziguk».

**Txabirekiko harremana bera nor zen erdi ez jakinean izan omen zenuen. Beste ETAkide batzuekin izan al zenuen harremanik?**

O! Handik mordoa pasatu ziren: Campillo, Uzelai, Mario, Papi... Geroago Yoyes eta bere ahizpa bat ere bai. Liberaturik eta oso ondo lan egiten zuten han. Bat-batean sotora etorriko zitzaizkizun bazkaltzera. Zertanbait bazebiltzana banekien, baina asmatu ere ez zertan. Paseatzen bezala etortzen ziren, erbiak baino begi zoliagoz. Abertzale izpiritua garai horretantxe hartu nuela uste dut. Zer soziala oso aurreratua neukan, baina abertzaletasuna Gogor mugimenduaren inguruan neugandu nuen. Hantxe sentiarazi zidaten zapalkuntza nazionala, eta euskaldun sentiarazi ninduten.

Mugimendu harekin berehala eta guztiz bat egin nuen. Eta jazarpen poliziala ere orduantxe areagotu zitzaidala uste dut, konpromiso politikoan sartu nintzenean. Apaiz sindikalista gisa jasaten ninduten, baina hori ez zidaten barkatu.

**Eta atxilotzeak ere izan zenituen batzuk.**

Komisariatik zazpi aldiz pasatuko nintzen.

**Torturatu ere bai?**

Ez. Errespetatzen ninduten. Nik aurre egiten nien beti, tatarrez eraman behar izaten ninduten.

**Atxilotzen zintuztenean, tatarrez eramanaraziz gainera, xaxatu eta nekarazi egiten omen zenituen.**

A, bai! Komisarian, adibidez: «Apaiza naizelako bibliotekan? Ez horixe! Behera eraman arte ez dut jango». Eta ez nuen jaten. Beste behin, Zamorara ninderamatela, polizia batek bidean: «Kafe bat hartuko genuke, baina zurekin...». Eta nik: «Ez, ez! Nik ahal dudan unean ihes egingo dut».



**Ez dago esan beharrik espetxearen gomuta atseginik ez duzula izango, zinen aktiboa izanda.**

Espetxea espetxe gisa infernua da. Eta, gainera, Elizaren kontraesan nabarmena. Fartsa bat, lotsagabekeria. Apaiz eta kristau izatea aurpegia eta bizkarra eman zutenak ahaztea baldin bazen, oi!... Baina bestetik halako lagunak, halako kideak han aurkitzea hunkigarria izan zen. Bizitzan gertatu zaidan gauzarik ederrenetarikoa espetxean lagun haiekin bat egitea izan zen, batez ere askatasunean irteteko eta komentuetara aldatzeko apezpikuen sirena-kantuei tinko eutsi zien taldearekin.

*Talde hartako bi geu ginen eta ondo gogoan daukagu, beste guztiek izango duten bezala, nolako gatza eta bizitasuna ezartzen zion Perikok espetxeko murriztasunari. Behin Nuntzioaren ordezkaria etorri zitzaigun, solemneki jantzia eta handiro lagundua. Apaizen etxe hura konkordatuan ez baitzen koadratzen, bazen hizpide eta istilu ugari. Nuntzioaren ordezkaria hizketan hasiz batera, Perikok moztu zion: «Ehun mila baino gehiago ala gutxiago?». Orduan hilean mila pezetako soldata handia zen eta, horixe esan nahi zion, alegia, berriketak utzi eta hilean zenbat kobratzen zuen esan zezala. Eliz gizon gorrizkoak bere prediku katoliko eta diplomatikoan jarraitzen zuen, eta Perikok behin eta berriz ehun-milako horixe jaurtitzen. Eszena gordina eta Fellinitarra izan zen benetan. Hamaika barre egin genuen gero, hura gogoratuz. «Zer, Periko, gehiago ala gutxiago?» Eta Perikok: «Eskerrak behiaren txistea kontatu ez nion!». Bazuen Perikok txiste bat, nahiko txarra, noski, baina beti zerbait aldatuz kontatzen ziguna. Lehertu egiten ginen, bere kontaeragatik gehienbat.*

**Aizu, Periko, zuk soldata ez dakit, baina karguak mordoa izan dituzu.**

A, bai. Txomin Ziluagak beti aurkezten ninduen esanez: «Hauxe da Euskadin kargurik gehien daukana». Lehenengoan, Euskadiko Ezkerrarekin nindoala, Madrilerako gutxi-gutxigatik ez nintzen irten. Bigarrenean, Herri Batasunarekin

Monzon, Ortzi eta ni neu irten ginen. Hirugarrenean Monzon, Castells –hau senatari– eta ni. Gero hemen berton diputatu, juntero, zinegotzi... beti ibili naiz karguz josia, Mahai Nazionalekoa eta ordezkari sindikala izanez gainera.

**Euskadiko Ezkerrarekin hasi eta Herri Batasunera pasatu. Nola eta zergatik izan zen hori?**

Hemen, Villa Pakitan, EEko buru guztiak ibiltzen ziren orduan. Pozik zeuden ni eurekin joan nintzelako, baina borroka armatuaren aurka sumatu nituenean, «baina nola?», pentsatu nuen. Behin Txomin Ziluaga etorri zitzaidan eta HBra pasatu nintzen. Gero Iñaki Markiegik eta esaten zidaten: «Aizu, Periko, baina nola?». Gainbehera etorri zitzaien: ni eurekin mitinetan eta, bat-batean, HBko zerrendaburu. Gogoratzen naiz behin Bilbon manifestazio handi bat izan zela, blokeetan banatua. Ni, neure usnaz, HBko blokean sartu nintzen. Euskadiko Ezkerra bere aldetik zihoan. Biharamunean Ormaiztegin EEren mitin bat genuen, eta nik: «Atzo ikusi bazenute zer-nolako emozioa, ukabilak jasota, Poliziari oihuka!»... Eta Mario Onaindiak: «Hemen bakea erradikalismorik gabe lortu behar da», eta hala. Bandres ere han zen. Iñaki Martinezek esan zidan: «Ederra egin duzu!». Eta, egia esan, aldakuntza ederra egin nuen, gauetik goizera, ilunetik argira bezalakoa, eta ni erabat pozik.

*Perikoren mitinak mundialak izaten ziren. Hizkera direktoa, argia, herri-herrikoia, eta erasokorra. Eta era batera barregarria. Behin baino sarriago izan zituen arazo judizialak, Anoetako belodromoan esan zuenean, adibidez: «ETAk Ybarra, Lipperheide eta holakoak bahitzen dituenean, zuen etorkinlurrak lotsagabe, lukurreru eta lapurretatik garbitzen ari da». Frankismora atzera-jauzi bat eginik, bi pasadizo aipatuko ditut, bata garaia islatzen duena: Ibarrolak erakusketa bat Villa Pakitan egin zuen. Frantziatik-eta etortzen omen ziren ikusleak, baita erosleak ere. Nolako kontraesana, erakusketa klandestinoa! Eta bestea Perikoren izatea hunkigarriro agertzen duena:*



Behin neska bat haur jaioberri batekin Arboledatik ekarri zidaten, eta hantxe eduki nuen, arazoa konpondu arte. «Egon lasai –esaten nion–. Ni San Jose naiz». Umezain ere egiten nuen, mutilarengana joan zenean eta abar, baina ez ziren ezkondu. Neska zamorarra zen eta, azkenean, familia etorri zen eta asko eskertu zidaten.

**Jesus haurtxoa Belenen eta beste haurtxo hori Villa Pakitan, beraz, San Jose eta guzti. Azken galdera, Periko. Zergatik darabilzu beti txapela?**

Oi! Hau sinbolo bat da, borrokan dihardUen eta hortxe eusten dion pertsonaren ezaugarria. Konpromiso politikoan sartu nintzenetik daramat. Klasea gehi aberria, hori da nire borroka. Txapel honek iraupena, tinkotasuna adierazten du. Janzki gisa, traba egiten dit, baina ez dut kentzen. Periko oinutsa, langilea, atxilotua, presoa, politikoa, errebeldea, makurgaitza... horren guztiaren erakusle dut txapela».

# LUKAX DORRONSORO:

## ZAMORAKO KONTUAK

Lukax Dorronsoro

ZAMORAKO KONTUAK... HANGOAREN SUSTRAIAK adierazten hasteko urrutira joan beharko nuke. Nik gerra ezagutu egin nuen. Mutil koxkorra nintzen, Ataungo Aian. Gogoratzen naiz, nafarrak zetozela-eta, aitak eta auzokoek –gure baserria hiru familiakoa zen–, mando eta asto gainetan umeak hartu eta familia guztia mendiko bordetara eraman gintuztela. Bi borda zituzten eta hantxe banatu ginen guztiok. Ez zen ezer gertatu. Episodio hori gogoan daukat, hala ere; oso gogoan. Politena da, gure aitak, garai hartan, eskuin aldekoei emana ziela botoa! Hiru familiako etxe hartan batzuek alde batera eta besteak beste aldera eman zuten botoa; baina oso ondo konpontzen ziren. Etxean ez ezik Aia auzo osoan ere, oso ondo konpondu ziren. «Orain horiek zatozak eta lagundu egin beharko diguzue!», esaten zioten elkarri txandaka. Eta halaxe egiten zuten, batak besteari lagundu...

Hildakoak izan ziren gerran, espetxeratuak ere bai eta elkarri ezkutalekua eman eta lagundu ziotenak ez gutxi. Bordan ezkutatu behar izate hura eta abar gogoan gelditu zitzaizkidan: gerran hildakoak lurperatzea, kanposanturako prozesioak, hegazkinen bat edo beste pasatzen, gerra bukatu zenean bota zituzten etxafuegoak...

Geroztik, Franco eta haren aldeko guztia nire etsaia izan da, ni harena bezala.

Nire kasuan, hor du jatorria Zamorako kartzelara egin nuen bideak.

Hurrengo urratsa: apaizgai, Saturraranen. Han, arrasatear abertzaleak ezagutu nituen. Borroka teoriko, ideologiko edo dena delako hori gertatzen denean, une hura datorkit gogora. Hor jartzen dut nik harrezkero egin nuen bidearen hasiera. Hamahiru urte nituen, 1945. urtea zen. Ordurako, osaba bat etxean bizitzen edukita geneukan, osaba Patxi. Denboraldia egin zuen gurean, kartzelan urteak eman eta gero, Arrasateko lagunen senitartekoek bezala. Gogoan dudanez, Saturraranen beren burua abertzaletzat erakusten zuten bakarrak Arrasatekoak ziren! Bolinaga –geroan Bergarako alkate izandakoa–, zen haietako bat, eta Simon, haren lagun handi bat, bestea; biak ni baino ikasturte bat zaharragoak. Bigarren ikasturtearen hasieran, Joxemiel Barandiaranek gure Historiaurreari buruz egindako lanen berri eman zigun don Anton Garro irakasleak. Lehendik ere banuen nik, noski, Joxemielen berri, ataundarra naiz-eta. Hala ere, zirrara berezia nabaritu nuen gorputz osoan, hari buruzko aipamen baikor eta ausarta entzun nuenean; are gehiago, Francoren matxinadaren ondorioz ihesi atzerriratuta zegoelako garai hartan. Horrela kokatu nintzen gure kulturaren munduan. Handik aurrera... bertsotxo batzuk idatzi, giroko lagunak egin ere bai... Bide horri segitu nion. Bizian besterik ez dut egin: gure kulturaren alde ahalik eta gehien ematen saiatu. Abertzaletik eta ezkerretik jo genuen, euskararen aldeko lanean, liburuak irakurtzen, ezkutuan bata besteari liburu haiek pasatzen...

Gaztelun (Gipuzkoa) nintzen 1960ko hamarkadan, seminariotik zuzen hara apaiz joana. Beste herri txiki bat zen Gaztelu, Ataungo Aiaren modukoa; eta bete-betean sartu nintzen han, baserritarren artean. Gaztelun nengoen, baina batetik bestera ibiltzen nintzen etengabe: Donostiara, Tolosara... Seminario garaian lagun egindako apaiz zaharragoekin harremanetan jarraitzen nuen, don Anizeto Zugastirekin, esaterako. Loiolako La Sallekoen kapilaua zen Anizeto Zugasti, baina katedraleko koru-kantore benefiziatua ere bai. Ez dakit zenbateraino nintzen kantari ona, baina seminarioko abesbatzatik aukeratutako taldetxo batekoa izan nintzen. Igandero katedralera joaten ginen, kantatzera. Hango koru bazterrean izaten nituen harreman subertsiboak don Anizetorekin. Hura gorri-gorrietakoa zen, gerran asko sufritutakoa. Gasteiztik Donostiara joan gineneko udan, 1953an, Gasteizko seminarioan gure aita espirituala izandako Benantzio Izetarekin egin genuen topo Arantzazun. Gu, Jexux Gaztañaga eta biok ginen. Benantzio Izeta hark aurkeztu zigun Anizeto Zugasti: «Honek erakutsiko dizue arretaz jokatzen», esan zigun. Eta Zugastik, ohartu baitzen haren ibilerak harritu egin gintuela: «Bai, bai: herrena nauk, baina, ezkerreko hankatik, Jainkoari eskerrak».

Arantzazuko ikasle jendearekin ere harremanak genituen, *Yakin* aldizkariaren sorreran areagotu zena. Hor ibiltzen ginen: olerkitxoren batzuk idatzi, artikulutxoren bat, sari txikiren bat... Kultur giroan genbiltzan guztiok ezagutzen genuen elkar, Euskal Herria oso txikia da-eta. Seminarioan hasi nintzen antzerkian ere, eta geroztik ez dut utzi. Eta antzerkia nonbait ematekotan, batarekin eta bestearekin harremanetan jarri beharra zegoen. Kultur giro hartan, harremana, apaiz eta erlijiosoekin bai, bagenuen, baina, batez ere, euskaraz kultura egin nahi zuen guztiarekin genuen lotura. Denok ginen lagun. Aresti gure laguna zen, laguna! Adarra jotzen zigun, eta guk ere bai berari. Esaten zuen: «Orixe, Aranalde eta Lukax desagertzekoak dira». Bere brometako bat zen, Lizardiren omenez Tolosan antolatu zuten olerki lehiaketan ez ziotelako saririk eman –bidegabekeria galanta!–, eta guri bai (Irigoien, 1961). Hala ere, hurrengo urtean, Orixeren omenezko sariketa egin zutenean, berak irabazi zuen, Aranalde eta biok atzetik gintuela (Irigoien, 1962).

Garai hartan, beraz, kultura eta politika, elkarrekin zebiltzan. Erraza zen batetik bestera salto egitea. Orduan gotzainak

ere bazekien horrenbeste. Lehenengo, Font Andreu ezagutu genuen, kataluniar frankista. Gero, Bidaniako Lorentxo Bereziartua. Baserritarra, baserritar handien ondoan hazitakoa eta baserritar handiek gotzain egin zutena. Hala ere, ezagutu nuenerako giza itxurak hartzen hasita zegoen. Hark bazekien borroka politikoa, eta kulturala, bat zirela Euskal Herrian. ETAk berak, kultur adarra, adar armatua, langile adarra... zituen osagai. Dena zegoen hor. Kulturan ari ginen, eta nola ez genuen, bada, harremanik izango halako eta halakorekin? Jesukristo guztiarekin! ETAn zebiltzanekin eta ez zebiltzanekin. Batere uste ez zenuela, mutil edo neskaren bat etortzen zitzaizun etxera, laguntza eske. Eta zer egin behar zenuen, bidali, ostiko bat emanda? Pozik hartu etxean!

Horrela genbiltzan, eta horrela iritsi zen 1967ko Maiatzaren Lehenengoa. Manifestazioa Ordizian. Hara joan nintzen. Nire inguruko jendea, Herri Gaztedikoak, esan nahi dut, Donostiara zihoazen. Haiek Donostiara, ni Ordiziara. Ni fitxatuta nengoen, polizia-etxean ere hainbat aldiz izanda. Etorri ere egiten ziren Gaztelura. Bidean ni geldiarazi ere bai, susto ederrak emanez.

Txato Agirrek eta biok egin genuen manifestaziorako propaganda orria, ETAren izenean. Mikel Zuazabeitia adiskidearekin joan nintzen Ordiziara. Manifestazioan herriko plazaraino heldu ginenean, guardia zibilez inguratuta gertatu ginen. Beraz, istilua sortu zuten eta... han non ikusten dudan gure anaia Pelix, lepotik helduta zintzilik dakartela; hura txiki xamarra eta! Zuzenean joan nintzaien guardiei: «Zer da hau? Zer egin dizue honek?! Trata ezazue behar den bezala». Sotanaz jantzita nengoen eta kasu egin zidaten: zutik utzi zuten. «Ea, alde hemendik!», esan zidaten. Eta banindoan, eta banindoala, beste guardia zibil batzuk: «Nora zoaz?!», «Hemendik alde egiteko esan didate!». «Hemendik alde? Ez! Etorri hona gurekin!». Eta buelta. Eta, auzotik, beste guardia zibil batek: «Hara hemen, don Lukax! Harrapatu zaitugu! Pozten naiz!». Tolosako polizia sekretu bat zen, oso ezaguna guretzat. Aurretik beste zenbait istorio izanak genituen harekin. Ordiziako kuartelera eraman ninduten. Geroxeago, han ziren Mikel Zuazabeitia, gure anaia Pelix eta beste jende mordo bat, denok barrura bidean. Lau urteko kondena eskatu, eta bikoa ezarri zidaten. Manifestazioarengatik! Huraxe zen, bada, ezer ez eta festa! Kartzelara eta kito! Orain bezala.

Madrilen egin ziguten epaiketa. Nik, euskaraz egingo nuela. Euskalduna nintzela eta euskaraz egingo nuela. Apaiza ez ezik, borrokalaria nintzela. Juan Mari Bandres genuen abokatu: «Baina nola egingo duk euskaraz?! Lau urte ezarriko ditiztek!». «Ondo da. Noizbait ere egin beharko dugu zer edo zer! Hau ezin da pasatzen utzi». Eta lagunei: «Ni euskalduna nauk! Guardia zibilei ere euskaraz hitz egin zieat, nahiz eta gero gaztelaniaz ere esan behar izan gauzak. Ez diat makurtu nahi!». Eta euskaraz hasi nintzen epaiketan. Haien galderari, euskaraz erantzuten nion nik. Erantzun, bai; baina, euskaraz. Dozena erdi bat galdera egin zituzten eta kito. Berrehun pezetako isuna jarri zidaten euskaraz egiteagatik, eta hor eten zen nire deklarazioa. Orduan bai, hitz egiteko baimena eskatu nuen. Esan nien erdaraz ez erantzutea ez zela izan gaztelania gaitzesten nuelako: harro nengoela gaztelaniaz ondo ikasten saiatzeagatik, gainerako hizkuntza guztiak bezala estimatzen nuela, hizkuntzek berezko balioa dutela. Eta gaztelaniak ere bai, jakina. Eta ez nuela besterik eskatzen, nirea ere, euskara alegia, ikasketa aroan irakatsi zidaten gaztelaniaren maila berean aintzat hartua izatea. Eta kito. Hor bukatu zen nire erretolika. Bi urteko zigorra ezarri zidaten, esan dut, besteei bezalaxe. Gure aurreneko takatekoa hori izan zen, euskara zela-eta, Madrilen. Zein gauza txikia, eta zein handi bihurtua! Nik, izan ere, sekula ez dut gauza handietarako joerarik izan. Gauza txikiek eman digute nahiko lan, askotan handiki debekatuak izan zaizkigu eta.

Epaiketa egin ziguten, baina ez gintuzten berehala eraman zulora. Epaiketatik hilabeteetara [Meliton] Manzanas garbitu zuten. Manzanas garbitu eta hurrengo egunean, be-

rriz, edo handik bi egunera, batzarra genuen Amasan. Gaztelura bueltan, hango polizia grisen mugimendua! Gauean, etxera etorri zitzaizkigun, Gaztelura, goizeko bostetan, edo lehentxeago, aldaba joka. Atera naiz leihora eta, irekitzeko atea! «Atea garai honetan ireki?», nik, ezetz, garai hartan ez niola inori aterik irekitzen. Etortzeko egun argitan. Banekien ni kartzelara eramatera etortzekoak zirela, baina noizik ez. Uste ez nuena, Manzanasengatik etorri zirela! Ezetz, ez nuela aterik irekiko. Etortzeko egun argitan. Irekitzeko atea, haiek, eta ezetz, nik. «Ba al dakizu zuri bost bala sartu ezinik ez daukagula?!». «Nahikoa duzu bat, ondo apuntatzen baduzu, behintzat». Halako batean ireki nien. Eta hantxe ibili ziren, arratsaldeko hirurak arte, etxe guztia miatzen. Euskaraz idatzita zeuden paper guztiak eraman zituzten, baita idazmakina bera ere. Auskalo non diren. Honezkero galduta daude, desagertuta gure makina handi hura ere.

Lehenengo, Ondarretako (Donostia, Antigua) guardia zibiletara eraman ninduten. Gazteluko eta inguruetako lagun pila bat zen han. Gero, Aldapetako Poliziaren kuartelera. Goizeko hirurak-edo izango ziren. Ohez betetako gela handi xamar batera sartu ninduten. Han, beste lagun mordoxka bat ikusi nuen ohean etzanda, erabat estalita, bururik bistan ageri ez zutela. Zer edo zer esan behar eta «gabon!» esan nien, baina erantzunik ez nuen jaso. Ohe baten barren aldetik hankak ateratzen zirela ikusi nuen. Ohetik kanpora oinak! Hain handia... berehala antzeman nion: Pio Montoia zen, apaiza hura ere, famatua. Familia aberatsekoa. Besterik ez nuen ezagutu.

Hurrengo goizean, esnatu, jaiki... eta han ez zela inor mugitzen! Komuna eta garbitzeko lekua non zeuden galdezka hasi nintzen eta, ondotik: «Ixxxxxxxxxi!», batek. «Baten bat hil al da ala zer dugu hau?», nik. Eta ondokoak: «Ez, baina uste nian fusilatu behar gintuztela!», Pio Montoiak. Gerrako jendea. Gerran erbestea bizi izandakoa zen, eta ezagutu egiten egoera! Hilko zituztela pentsatuta egon omen ziren.



Tortura eta tratu txarrei dagokienez, belarrondoko bat, ederra, jaso nuen behin, eta gibelekoa, berriz, beste behin; pistola lokian jarri, hiruzpalautan. Irainak eta nazkagarrikeriak, berriz, etenik gabe entzun behar izan nituen. Belarrondokoa nork eman zidan ez daukat gogoan; gibelekoa bai: Losada famatuak eman zidan. Eta irainak eta nazkagarrikeria gehienak Lopez sarjentuak. Biak hilda daude eta Ordizian burla egin zidan hura ere bai. Ez dakit zergatik egin behar zioten burla inori.

Armadan [polizia armatua] geundela, Aldapetan, gotzaina etorri zitzaigun bisitan. Bereziartua, alegia. Aurretik egonda nengoen berarekin, nire adiskide bat preso hartu zutela-eta Polizia etorri zitzaidan batean... Garbi agertu nion nondik nora eta zertan genbiltzan, izenik eman gabe, xehetasun denak ere kontatu gabe. Baina borrokaren nondik norakoak, harremanak eta abar, bai, kontatu nizkion. Ez zidan ezer esan, aholkua eman besterik: «Ezagutzen al duzu... Ikusita nago ni liburu txiki azal gorriko bat... Ba al daukazu?». «Bai, nonbait ere bada!», nik. «Letu ezazu. Nik esan diezazukedanak ez dizu batere balioko, baina han erakusten zaizunak bai». Militantea erortzen zenean eta horrelako kasuetan zer eta nola jokatu esplikatzen zuen liburuaz ari zen! Gozoro harritu ninduen gotzainak! Gehiagotan ere saiatu ginen gotzainarekin egoten gure espetxe zigorra zela-eta, baina bikario jeneralak hartzen gintuen beti. Guk esaten genuen kartzelan nahi genuela bete zigorra, gainerako zigortuek bezala. Ez genuela bidegabeko zigor hura apaizentzako kartzelan bete nahi... Bikarioak, berriz, ezetz eta ezetz, komentuan beteko genuela zigorra. Lortu genuen, azkenean, Bereziartua gotzainarekin berarekin egotea. Mikel Zuazabeitia eta biok bisitara joan gintzaizkionean, ingurukoek engainatuta zeukatela esan zigun: «Lasai egon, ez zarete komentura joango: kartzelara joango zarete, zuen jarrera oso ondo iruditzen zait eta! Bazegoen zuek bezalakoen premia!». Horrelakoak esan zizkigun.

Aldapetara bisitan etorri zitzaigun aldian, berriz, hauxe esan zigun gutxi gorabehera: «Askotan, garaia pasatu arte ez ditugu begiak zabaltzen! Baina esan beharrekoak esango ditut, alferrik ibiliko dira!». Hau eta beste esaka, oso urduri ari zitzaigun eta, lasaitze aldera: «Egingo al dugu musean, don Lorentxo?». Gu herriak bisitatzen ibili zenetan berarekin jokoan eginda geunden-eta, behin baino gehiagotan, lehenago ere. «Musean egiteko gogorik geratzen al zaizue?». «Bai, noski. Ekarri gaituztelako gaude hemen, ez gaiztoak garelako!», esan genion. Eta musean egin genuen, Aldapetako kuartelean, gotzainarekin. Hortxe ematen dut nik Bereziartuaren neurria, nirekiko. Eta esan beharrekoak esan egin zituen, eta kristoren kondenak jaso zituen. Faxista guztiak kontra atera zitzaizkion! Beste batzuek barre egin zioten. Guk ezagutu egiten genuen, bagenekien faxista izana zela, frankismo garaian zer izango zen, bada, gotzaina! Engainatu egiten zutela aitortzen zigun eta esan beharrekoak esango zituela. Eta, azkenean, esan ere bai. Karta pastorala egin zuen, gu kartzelan geundela. Eta hil egin zen handik denbora gutxira. Gero Jacinto Argaia, gotzain berria, etorri zitzaigun kartzelara. Baita guk airean bidali ere. Gezurra besterik ez zuen esaten!

Hamasei hilabete egin nituen kartzelan, Zamoran. Han, taldea irmoa zen. Neu nintzen aparte xamar ibiltzen zen bakarra, itzulpen lanari emanda nengoen-eta. Euskara ikasle taldea sortu zenean, orduko zer edo zer ikasita nengoela uste nuelako-edo, neure itzulpen lanekin jarraitu nuen. Armadara [Aldapetan] sartu orduko banuen eskuartean Martin Luther Kingen liburu bat, eta huraxe itzultzeari ekin nion. «Erotuko nauk bestela!», esan nion neure buruari. Entretenigarri huraxe izan nuen; denbora-pasa, itzultzen. Lehen ere, elizbarrutiaren itzultzaile taldekoa nintzen, Manuel Lekuonarekin eta beste ezagun askorekin batera. Zamoran nengoela, berriz, Euskaltzaindiak beste zenbait lan bidali zizkidan itzultzeko, eta horixe izan zen nire lana kartzelan.



Mikel Zuazabeitia eta biok kartzelara eraman gintuztenean, beste jende mordo bat zegoen han, isunak ez ordaintzeagatik zuloan. Ez zen nolanahiko jendea ere: Alberto Gabika, Periko Berrio, Imanol Oruemazaga, Xabier Amuriza... Kategoriako jendea! Munstrokeria zen jende hura kartzelan edukitzea. Hala zen orduan eta hala da orain ere. Kristoren kategoria zuten, eta han! Isunaren ordainari zegozkion egunak bete eta atera egin zituzten, eta Mikel eta biok gelditu ginen eskuz esku. Hurrena Tiko Botey katalana etorri zitzaigun eta bikain konpondu ginen, neguan manta beltzetan bilduta edo logelan paseo luzeak eginez. Horrelaxe lortzen genuen hotza gainditzea. Udaberri aldera gose-grebalariak eta besteak etorri ziren. Haiek egin zuten Zamorako benetako historia.

Gerran hasi zen kate hartan beste begi bat izan nuen nik Zamora. Benetako kolpea, hala ere, niri, senideak harrapatzeak eman zidan. Hura bai zartakoa. Oso gaizki pasatu nuen harrapatu zituztenean. Unai, Jone eta Izko. Beste asko erori zirenean ere, berdin, zartakoa. Jende asko. Lagun asko... Ni barruan nengoela harrapatu zituzten senideak, eta horrek eman zidan min. Gurasoek ere asko sufritzen dute... Zartako handia izan zen, bai. Gainerakoan, esan nezake barruan oso erlazio ona izan genuela denok: gipuzkoarrak, bizkaitarrak... Giro ona, errespetu ikaragarria elkarri...

1968an sartu ninduten eta 1969ko abenduan irten nintzen. Eta ez nuen apaiz iraun. Kartzelan bertan garbi ikusi nuen hortik biderik ez nuela...

## ZAMORAN LIZENTZIATU NINTZEN TEOLOGIAN

Mikel Zuazabetia

AITA ARETXABALETAKOA NUEN; AMA, Eskoriatzako Marin auzokoa. Neu izan nintzen zazpi anai-arrebotan Gasteizen jaiotzen azkena. Ni jaio eta berehala joan ginen denok Aretxabaletara. Izan ere, Errepublikaren denbora zen, eta aitak lana galdu zuen. Aberats baten txofer lanak egiten zituen, eta, itxuraz, aberats hura beldurtu egin zen, eta autoa eta txoferra kendu. Eta Aretxabaletara. Baina Lizartzan hasiko nuen kartzelarako bidea...

Apaiz izan nintzen. Lizartza izan nuen lehenengo herria. 1956a zen. Herrian nazionalistak ziren gehienak. Baziren Francoren aldeko banaka batzuk, garai hartan *karlistak* esaten zena: alkatea –eta haren familia–, udaletxeko idazkaria –eta familia–, jauntxo batzuk, zenbait baserritar...

Guk meza euskaraz egiten bagenuen, jauntxo jende horieta meza gaztelaniaz egin behar zela, edo latinez. Horrelako kontuak. Eta gotzaindegira bueltaka ni, salaketa jarri zidatelako euskaraz errezatzeagatik. Gotzainarekin iskanbilan ni, letaniak euskaraz esan nituelako! Guardia zibilek parte hartu zuten, eta salaketa sartu gotzainaren aurrean.

Guk euskararen maitasuna genuen. Hori, batetik. Bestetik, Eliza bera esaten hasita zegoen gauzak ulertzeko moduan egin behar zirela; latinez esaten ziren oraindik mezak. Ahal

zena euskaraz egin beharra zegoen, beraz. Lehenengo pausoa, arrosarioko letaniak euskaraz esatea izan zen. Horrek, hala ere, ez zuen batere ikustekorik guk seminarioan ikasi genuen harekin. Seminarioan ez ziguten batere euskaraz erakutsi. Behin ere ez. Ezta gogoa sartu ere. Seminarioan euskaraz hitz egiten genuenok talde txiki-txikia osatzen genuen, oso talde zarratua: Leintzekoak ginen, Arrasate, Aretxabaleta, Eskoriatza, Oñati... Bestalde, ataundarrak, oiartzuarrak... Gainerakoan, gutxi seminarioan euskaraz hitz egiten zutenak. Seminarioa, esan dut, baina seminarioak esan beharko nuke, Donostian, Saturraranen, Gasteizen eta atzera berriz Donostian jardun genuen-eta ikasten...

Seminarioan euskara gogoa sartu ote ziguten... Kasua kontatuko dizuet. Donostian, koruko zuzendaria nintzen, arduraduna. Neuk erabakitzen nuen zein kantu eta nola kantatu. Artean, kantu gehienak gaztelaniaz egiten ziren. *Agur, Jesusen Ama* euskaraz, besterik ez. Ni, aldiz, euskarazko kantak sartzen hasi nintzen: *Ogi zerutik, Hona bildots eztia...* Berehala, seminarioko erretorearen deia, ea zertan ari nintzen. Nik, berriz, donostiarren batzuk izan ezik gainerako guztiak euskaldunak ginela eta zertan ari ginen gaztelaniaz kantatzen. Kontuz ibiltzeko, horixe esan zidan. Nik, ordurako, 23 bat urte izango nituen, ez nintzen umemokoa. Kontuz ibiltzeko. Harekin egon eta hurrengo egunean, koruan, kantuak euskaraz nik, berriz. Eta atzera hots egin zidan: «Nik esango dizut nola egin behar den: hiru kantu izango dira mezan, bata latinez, bestea gaztelaniaz eta hirugarrena euskaraz». «Ikusiko dugu. Batzuetan euskarazko bat eta gaztelaniazko bi izango dira, baina, gainerakoan, hirurak euskaraz», nik. Biharamunean joan naiz eta zer da eta: «Lehenengo eguna diagu eta bana egin beharko diagu», hasi nintzen ni. Aldamenetik, apaizgai batek: «Ez, euskarazkoa ezin da kantatu». «Nola ezin dela kantatu? Nor zara zu horrelakorik esateko? Neu naiz arduraduna». «Bada, erretoreak agindu dit zure begirale izateko, eta esateko zuri ondo ari zaren ala ez». Horrela. Zapalketa giroa zen.



Eta handik irten eta Lizartzara; zer egin behar nuen nik? Bost lagun ziren euskaraz ez zekitenak nire garaian. 800 laguneko herrian! Idazkariaren familian lau lagun ziren. Haiek, eta medikua, euskaraz ez zekiten bakarrak.

Eta zitazioak, Guardia Zibilak, eta gotzaindegira bueltak... euskara zela eta ez zela. Font Andreu genuen gotzain.

Bi urte egin nituen Lizartzan. Eta ez zen normala bi urte igaro eta apaizari beste herri bat izendatzea. Gotzainak atera ninduen handik. Getariara joan nintzen. Getarian ez zen problemarik izan, zeremonia eta errezo guztiak euskaraz egiten ziren-eta. Dena dela, Getarian nengoela, Donostiara joan izan nintzen Maiatzaren Leheneko manifestazioan. Han, seminarioko lagun bat sindikatuan zebilen. Seminariotik irten eta sindikatu bertikalean sartuta! Donostian, Maria Kristina hotelaren pare-parean lan-bulegoa dago, lehen sindikatu egoitza zena, goitik beherainoko falangearen gezi eta guzti. Bada, hortik atera ziren eta egurra eman ziguten. Egurra, gero! Kalekoz jantzitako jendea, handik irten gabardinaz jantzita, bandera espainola paparrean, atera makilak eta egurra. Nik lagun hura ere ikusi nuen. Berak ere bai ni, eta ikusi eta beste aldera joan zen. Gu sotanaz jantzita ginen denok, bulebarrean, bueltan-bueltan. Lehenengo, sindikatuko haiek etorri ziren. Gero, guardia zibilak. Hurrengo urtean, Maiatzaren Lehenengoan, elizkizuna nuen eta ez nuen Donostiara manifestaziora joaterik. Baina beste lagun bat motoan hartu eta Zarauzko tren geltokira joan nintzen, zein jende modu ote zihoan bada, manifestaziora. Kalekoz jantzitako guardia zibilak ikusi nituen han, aurretik ezagutzen nituenak. Han zebiltzan. Eguna joan zen eta, handik lasterrera, eskutitza jaso nuen, gobernu zibiletik, deklaratzera joateko, zenbait diligentzia ireki zituztela-eta. Gotzainari hots egin nion, Lorentxo Bereziartuari. «Bai, bai, etorri zaitez hona, nirekin hitz egitera», gotzainak. «Hara, zu jakinaren gainean zeunden? Zergatik ez didazu abisatu?». «Etorri, etorri!». Joan nintzen, eta esan nion: «Ni ez naiz manifestazio horretan izan, eta ez naiz joango deklaratzera». «Joan

egin beharko duzu». «Ni joan? Ez, ez noa, ez naizelako manifestazioan izan. Deitu zuk gobernadoreari eta esan ez nintzela egon». «Nik ezin dut hori egin», gotzainak. «A, ezin duzu hori egin? Bada, ni ez nintzen han izan eta ez naiz inora joango». Han ibili ginen eztabaidan. Azkenean, herriko guardia zibiletara joan eta esan nion sarjentuari: «Hara, eskutitz hau jaso dut, baina zuk ondo dakizu ez nintzela han izan, badakizu halakoren alaba ezkondu zela San Prudentzioko ermitan, han izan nintzela ni». «Bai, badakit, baina ezin nezake ezer egin». «Hara, bestea! Beraz, badakizu ez nintzela manifestazioan izan baina ezin zenezake ezer egin!». Deitzen dit atzera gotzainak, joateko gotzaindegira. Joaten naiz eta esaten dit: «Belaunika zaitez nire aurrean». «Ni, belauniko zure aurrean? Ez». «Belauniko!». «Ezetz, bada, ez naizela belaunikatuko». «Belauniko!». «Ezetz, bada, zure aurrean belauniko ez». Eta besotik heldu zidan eta belaunikatu egin behar izan nintzen azkenean. «Agindu niri gobernu zibilera joango zarela!». Nik, ezetz eta ezetz, azkenean baietz esan arte... Polizian, zain neukan Meliton Manzanas torturatzaile famatua, kolore gabeko begi handi haiek ageri. Kalapita latza izan genuen, hark niri, nik hari, goizetik ilunabarrera. Azkenean, Jose Antonio Agirreren heriotza eskela jarri zidan begi aurrean: «Hau bai nazionalista! Zuek, ezer ez! Komunista aluok!», esan eta bota ninduen gelatik, builaka...

Urrutitik zetorren, beraz, gure historia...

Getariatik Legorretara joan nintzen, 1964an. Ondoko urteetan hasi ziren Legorretan paper fabrikako grebak, eta istiluak izan genituen. Greba handiak izan ziren. Nik, sermoietan, hortik jotzen nuen. Herrian, berriz, baziren nafarrak, errekete izugarriak, ni sermoia egiten ari nintzela jaiki eta elizatik irteten zirenak. Langileen alde jarduten nuen sermoietan... Bazen liburu bat, Irazabalbeitia eibartar jesuitak idatzia, igande guztietako ebanjelioei buruzko gogoeta bat zekarrena, pobreziaz, langileen alde, aberatsen gainekoak... Handik gaia hartu eta egiten nuen sermoia. Guardia zibilak ere han ibiltzen ziren bueltaka, eta komeriak. Sermoiak, izan ere, euskaraz bai, baina gaztelaniaz ere izaten ziren.



Greba zela-eta, sermoia beti kontu haren inguruan egiten nuen. Bestalde, gazteekin ere bilerak egiten genituen *–gizarte eskola* esaten zitzaion– entziklikak, Leon XIII.aren esanak... Horrelako gaiak aztertzen genituen. Gu apaizak ginen, ez ginen iraultzaileak! Elizaren dotrina soziala esplikatzen genuen, ez besterik. Gazteekin ez ezik, gizon helduekin ere egiten ziren bilerak: gehienek paper fabrikan lan egiten zuten.

Ordiziara joan ginen 1967an, Maiatzaren Leheneko manifestazioan. Xelebrea izan zen. Ordiziako plaza duzu udaletxea eta kale estu bat. Atzean, berriz, plaza txiki bat. Han bildu ginen. Goierriko jende mordoa bildu zen. Egunkari batzuei su eman eta hasi zen bilkura. Jaitsi ginen udaletxe aldera eta, han, guardia zibilak, ilaran, guri begira. Azaldu ginenean, han azaldu zen tenientea: «Hiru minutu emango dizkizuet hemendik alde egiteko!». Eta han hasi zen guardia zibiletako korneta, turuta jotzen. «Tiriri! Tiriri! Tiriri!», eta tiroka hasi zitzaizkigun, tiroka! Balak gure buru gainetatik pasatzen zitzaizkigun. Benetako tiroak. Balak. Jendea korrika lehengo bidean gora, mendi aldera... Denbora egin genuen han goian, ordubete bai, eta tartean-tartean tiro hotsa entzuten genuen, herritik zetorrena. Handik, goitik, Beasain aldera jaitsi ginen, nor bere aldetik. Nik motoa Ordiziako sarreran utzia neukan, Legorretatik hara joanda. Aldiz, Beasain aldean nengoen! Guardia zibilak herrian zebiltzan artean, eta nik atzeko kaletik ibili behar izan nuen motoa hartuko banuen. Motoa hartzeko puntuan nengoela, berriz, orduantxe guardia zibilak, tartean tenientea pistola eskuan zuela: «Horri, horri, heldu apaizari! Geldi hor edo tiro!». Eta barrura. Lukax ere egun hartan harrapatu zuten, plazan bertan. Itxura, ez zuen korrika egin eta harrapatu zuten. Beste apaiz bat, Bernabe Arizmendi ordiziarra, plaza hasierako etxe bateko balkoian zegoen. Bigarren edo hirugarren solairuan, begira. Guardia zibil batek hari begiratu eta: «Zu, jaitsi!». Eta jaitsi eta barru-

ra! Horrela! Beste bat, Martin Garin, apaiza, ordiziarra, Garin auzoan apaiz zegoena. Hura zer pasatzen zen ikustera etorri zen plaza aldera. Arkupeetan zegoen, paretaren kontra, begira. Bada, hura ere hartu eta barrura. Alegia, apaizen bila joan ziren... Ni ikusi ere ez ninduten egin manifestazioan. Motoa hartzen ikusi nindutenean, berriz, hartu eta barrura! Eta Lukax, eta Bernabe, eta Garin, eta... Hamalau lagun arte. Badut epaiketaren sententzia ere.

*«... probado y así ha sido declarado que la entidad declarada ilícita conocida por las siglas ETA (Euskadi Ta Askatasuna) tendente a segregar por la fuerza determinados territorios de la nación española al objeto de constituir con ellos un estado independiente, el de Euskadi, convocó por medio de impresos abundantemente difundidos una concentración para la mañana del 1 de mayo de 1967 en la plaza mayor de Villafranca de Oria cuya prohibición anunció el gobierno civil de la provincia mediante notas en la prensa y en la radio, los procesados... [hamalauren izenak], todos de buena conducta, salvo el primero que la tiene mala, y el séptimo que la observa de esta clase socialmente, conocedores del acto proyectado y de la postura del gobernador ante el mismo haciéndose eco del llamamiento aludido comparecieron alrededor de las doce y quince horas del día antes indicado en las proximidades de esta plaza mayor integrados en una masa de mil personas aproximadamente caminaron en forma multitudinaria hasta este punto profiriendo gritos de «libertad» interrumpiendo el tráfico [ez zegoen arren, kale estu-estua da-eta hura] y perturbando la paz callejera siendo invitados a la disolución por la guardia civil sin obtener éxito, ordenándose entonces los tres toques de corneta conminatorios para la disolución que fueron dados con los adecuados intervalos de tiempo, y entre dos de ellos el teniente de la benemérita, segundo jefe de la fuerza presente al mando del capitán, habló a la multitud insistiendo en la intimación (...) más acabados aquellos comenzaron a dirigirse a los guardias civiles los epítetos de hijos de puta, cabrones, maricones y asesinos, vertidos por personas desconocidas en la causa y a lanzarles piedras también por individuos ignorados, cuyos guardias tuvieron que efectuar algunos disparos al aire y cargar contra la agrupación, consiguiendo así dispersarla sobre las trece horas. Pero aglutinándose nuevamente quince minutos después unos trescientos individuos, formando en tal composición repetidamente el encartado Miguel Zuazabeitia Errasti, y el procesado Emilio...».*

Ezer ez. Gezurra. Kontu horiek, behintzat.

Akusazioa, berriz, ETAk deitutako manifestazioan parte hartu genuela.

Epaiketa egin ziguten, eta bi urteko espetxealdia ezarri. Manifestazioan parte hartzeagatik!

1968ko otsailean egin ziguten juizioa. Handik, etxera. Ekainean, Txabi Etxebarrieta akabatu zuten. Abuztuan, Meliton Manzanas, abuztuaren 2an. Hilak hiru larunbata zen. Bada, hilaren bostean, astelehen goizarekin, salbuespenegoera ezarri zuten. Legorretan nintzen, beste lagun batekin, etxean. Goizeko ordu biak aldera, *bum, bum, bum!*, ate joka. Guardia zibilak. «Ireki atea!». Nik, ezetz. Ez alferrik!, atea eraitsi zuten! Sartu ziren, ikusi zuten nire lagun hura, pentsatu zuten ETAkoa zela, eta hari eraso zioten. «Ezetz, bada! Apaiza dela, bihar gotzainarekin egon behar duena!». Hura ere barrura. Laster askatu zuten, ezer ez zuela ikusi zutenean. Hori, astelehenean. Ordiziako kuartelera eraman ninduten; hango garajean eduki ninduten, Land-Rover eta moto artean. Han, ostirala arte, egunero sarjentuaren aurrera azaldu, haren txorakeriak entzun eta atzera garajera... «Eta zu zertan sartzen zara saltsa hauetan! Zoriontsu bizi zintezke. Hara, proposamena egingo dizut: libre utziko zaitut, baina, ordainetan, Legorretan erbestekoren bat ikusten duzun aldiro, deia joko didazu. Ez didazu beste azalpenik eman beharko, ez nor den, zergatik dagoen herrian... Han kanpokoren bat dabilela jakinarazi besterik ez. "Aizu, herrikoa ez den neska bat ikusi dut". Nahikoa duzu hori. Eman dezagun, zuk orain minus boste-

hun duzu. Nik esan dizudan moduko telefono dei bat egin eta minus laurehun izango duzu. Beste dei bat, minus berrehun; beste bat, minus ehun... eta, ondoren, puntu positiboak izaten hasiko zara». Horrela jarduten zidan egunero; egunero. «Zuk zer uste duzu, ordea, ni ergela naizela?». Bera bai, ergela! Nola esan lekioke horrelakorik gizon egina den bati!...

Hantxe eduki ninduten. Lotarako ere, gaizki. Hirugarren egunean, aulki luze estu bat ekarri zidaten, jarrita egoteko. Hantxe egin nuen lo. Beti edukitzen nuen guardia zibil bat ni zaintzen. Bezperan, berriz, guardia zibila errukitu egin zitzaidan, lurrean etzanda, ez tapaki eta ez beste, eta garajean, abuztuan, hotz! «Ezin dut hau eraman», esan zidan guardia zibilak. Andreari koltxoia prestatzeko agindu, eta ekarri zidan, izara garbi eta guzti. «Ez, ez, ez dut nahi», nik. Berak, ezin zuela eraman. Eta koltxoia ekarri zuen, izara garbi perfumatu eta guzti! Errukitu, gizona!

Ordiziako kuarteletik, Aldapetara, polizia armatuaren kuartelera. Ni, Land-Roverraren barruan, ez nekien nora ninderamaten ere. Aldapetan jaitsi eta polizia mordo bat zegoen, bi ilaratan jarrita, kaleko atetik barrukoraino, patioan. Tarte dezentea. Ni, haien erditik, haien builaren erdian. Izugarria. «Asesinoa! ETA! Kabroia! Apaiz okerra!», eta horrelakoak. Barrura sartu, ate bat ireki, eta apaiz mordoa han! Hogeiren bat edo! Salbuespen-egoeraren aitzakian, apaiz pila eraman zuten hara. Fitxatuta zeuden gehienak, isunen bat jaso zutenak... don Pio Montoia, Serafin Esnaola... behi sakratuak!, buru pentsalariak! (Esnaola, 1994). Pio Montoia, esaterako, sekula parrokiarik izan gabea, ez koadjutoretzarik ez besterik. Alegiakoa zen, familia aberatsekoa. Txalet batean bizi zen Mirakontxan. Oso nazionalista zen, oso. Baina ez Serafin bezain aktibista, esate baterako. Haiek ikusi nik eta: «Zuek ere bai?», «Bai...». Pio Montoia guztiz konbentzituta zegoen fusilatuko gintuztela. Ez zuen lorik ere egiten. «Gerra hasi zenean berdin gertatu zen. Fusilatu egingo gaituzte denok!», zioen. «Ez ezazu zozokeriarik esan!», guk.



Han ziren Lukax Dorronsoro-eta. Beneditar bat ere bai, Juan Jose Onaindia, andoaindarra, gero 1968an Zamoran sartuko zutena... Land-Roverretan sartu gintuzten, eskuak atzean lotu eta Antiguako komandantziara eraman gintuzten. Deklarazioa han. Ea halako ezagutzen genuen, ea zein eta zein mugitzen ziren, ea zertan jotzen zuten gazteek gure etxera... Handik, epaitegira, eta Martutenera. Hamar bat egun han, eta Zamorara.

Hemezortzi hilabete egin nituen nik hango kartzelan. Oso ondo konpondu ginen denok. Gehienak aurretik ezagutzen nituen. Amuriza eta beste. Anaiarte ona osatu genuen. Pare bat izan ziren beren kabuz ibili zirenak, berekoi antzean jokatu zutenak, baina, gainerakoan, primerako lagunartea. Komuna bat.

Nik uste pertsona ohitu egiten dela, jarri egiten da. Horixe da tristea, horretara jartzea pertsona! Eta hori egin ezean, desesperatzekoa litzateke han barruan egotea. Horretaz ere hitz egiten genuen barruan: «Zer moduz?», eta «Ondo, hementxe, ikasten, hau eta hura egiten!»... Estudiatzen genuen, lo egiten genuen, jaten genuen... Jaten ematen ziguten gaizki, oso gaizki, alu haiek! Zamorak hiru pabiloi zituen: kartzela penala, probintziala –han ginen gu– eta emakumeena. Gosaltzeko, han eltze handi bat kafesnez betea. Burruntzalia sartu eta bezperako babarrunak hondoan. Eta hurrengo egunean, berdin. Eta hondoan babarrunak ez zirenean, dilistak, porruak edo patatak izango ziren. Izorratzeagatik egiten zuten!

Hogeita lau bat apaiz euskaldun bildu ginen ni han izan nintzen garaian. Bestelakorik ere bazegoen: lau katalan, eta gaztelar bat, Paco Garcia Salve, sindikalista famatua egin zena.

Zamoran lizentziatu nintzen Teologian, eta Filosofia ere ikasi nuen, gurekin batera preso zegoen Eibarko jesuita Imanol Gisasolak lagunduta. Deustuko Unibertsitateko irakaslea zen, asko zekiena...

Gose-greba bat daukat gogoan, Andoni Arrizabalagari heriotza zigorra ezarri ziotenean. Hamaika eguneko gose-greba, zigor hura kendu artekoa.

Irten nintzenean, dokumentu bat atera nuen. Barruko egoera kanpoan zabaltzea genuen helburua. Izan ere, kasu berezia zen apaizak kartzelan edukitzea. Harrezkero ere ez dira asko izan, arrazoi politikoengatik, esan nahi dut. Joxe Ramon Trebiño, Irungo artzapeza, eta besteren bat, baina bakan. Badiot gure egoera berezia zela, apaizak kartzelan. Bestalde, guk gainerako presoekin batera nahi genuen, halaxe eskatzen genuen, ez apaizen kartzelarik. Gotzainari ere idatzi genion, Lukax Dorronsorok-eta, pribilegiorik ez genuela nahi esanez. Gotzainak, berriz, hori ukatu ez ezik, koldarkeria galanta egin zigun...

Konkordatuak zioen apaizak epaitzeko gotzainaren sinadura behar zela, edo bikario nagusiarena, besterik ez bazen ere. Bada, gure kasuan ez batak ez besteak ez zuten sinatu, idazkariak baizik. Horrek ez zuen balio. Gure abokatuari ere esan nion, Juan Mari Bandresi, alegia. «Ez nago ados. Epaiketa, ondo da, egin dezagun. Baina ez dut onartzen gizon gizajoak, Zeferino Sarasola idazkariak, sinatzea gu epaitu ahal izateko». Gotzainaren idazkariaren sinadura baliatu zuten gu epaitzeko! Epaiketaren amaieran, azken hitza eman zigutenean, horixe adieraziko nuela esan nion Bandresi, abokatuari. Hark, ez egiteko horrelakorik, kaltea besterik ez zitzaidala etorriko-eta. Nik baietz, hark ezetz, eta ez nuen egin azkenean. Baina horixe egin zuen gotzainak: eskuak garbitu, bere burua zuritu, eta haien sinadurarik ez da ageri agirietan.

Kartzelan geundela apaiz iraun genuen, mezak esaten genituen, errezatu eta beste. Adibidez, Periko Solabarriaren kasua. Nik arrosarioa eraman nuen kartzelara. Nik bakarrik, nonbait. Ez dakit, bada, oroigarri eramango nuela iruditzen zait. Perikok, berriz, egunero niri: «Mikel, arrosarioa!». Uzteko berari, alegia. Ematen nion eta errezatzen zuen, patioan. Arrosario osoa errezatzen zuen hark. Bukatzen zuenean:



«Tori, Mikel, gorde bihar arte. Bihar eskatuko diat berriz!», arrosarioa niri. «Ez, Periko, heuk gorde!», baina ezetz berak. Eta nik gorde eta hurrengo egunean berriz eskatuko zidan. Horrelakoa baita Periko. Oso zen errukitsua. Gizon zuzen-zuzen-zuzena. Seminarioan ezagutu eta beatoa zirudien, Juan Avilakoa –beatoa, alegia– edo horrelakoren bat, benetan. Errezatzaile handia, Jaunaren agerian denbora asko pasatzen zuen elizan... Horrela! Apaiz langilea zen, peoia, Errontegiko zubia eraikitzeko lanean ari zena. Kapataz gradua eskaini zioten arren, berak ez zuen nahi izan. Bera beti peoi. Handixe eraman zuten preso Zamorara... Apaiz izateari utzi zionean ere, berdin jarraitu zuen, baina langileen borrokan guztiz sartuta. Hark erraz lotu zituen bi gauzak: «Niri fedeak horrela jokatzeko agintzen dit!», esaten zigun. Kartzelan asko hitz egiten genuen fedeaz eta Elizaz. «Elizak horrela jokatzen segitzen badu, zertan gaude gu hor?»... Apaizgoa uzteko asmoarekin irten nintzen nuen Zamoratik. Eta utzi nuen. 1970eko urtarrilean irten nuen kartzelatik, eta apirilean utzita nengoen, geroko sekularizazio prozesu bihurria gorabehera...

Urteak joanagatik ere, barruan daukat kartzelaldi haren akordua... Kartzela berez da gauza latza. Gainera, egunero egiten ziguten putakeriaren bat edo bi. Hala ere, egunik gogorrena 1969ko maiatzaren 9a izan zen. Egun horretan, gutxien espero genuela, kartzelari mordo bat agertu zen euren giltzatzar handi haiek hartu eta kriski-kraska zarataka. Zortzi preso berri zekartzaten, apaiz, jesuita eta fraide, Bilboko polizia etxean egunak eta egunak igaro ondoren. Azitaingo (Eibar) parrokoa, Jon Etxabe, iritsi zen handienak hartuta. Dena beltz-beltz, ez ezagutzeko moduan. Burua, lepoa, betondoak; begietako kanikak eta niniak; besoak, eskuak, azazkalak, bizkarra, bularra, sabela, barrabilak, ipurmasailak, izterrak, belaunak, bernak, orpoak, oinak... Den-dena zen ubeldura, zauria, haragi bizia... Eskuturretako bilurrak barru-barruraino estututa, hezurretaraino sartuak... Eta, antzera, Paskual Intxausti, pasiotar bizkaitarra; eta Segurako Patxi Auzmendi,

jesuita; Bakioko apaiz Joxemari Madariaga... Xehatuak. Gotzainari deitu genion, Jacinto Argaiari. Etorri zen, bere begiez ikusi zuen koadroa, eta zeharo izututa eta hunkituta alde egin zuen. Handik denbora batera, honela idatzi zuen gutun pastoralean: «Baldin eta egia balitz torturatu egiten dela, arbuiatu egin beharko litzateke pertsona hala tratatzea; baina egia ez balitz, agintarien aurkako irain astuna izango litzateke»...

Gaur egun, gauero-gauero ohera sartzen naizenean, pentsatzen dut: «Zein ondo hemen, ohean!». Gau bat ez dut pasatzen kartzelan dauden haietaz oroitu gabe. Hogeitaka urte daramatzate! Guk, azken finean, hemezortzi hilabete besterik ez genuen egin. Kartzela barruko bizimodua eskasa da, txarra! Eta urtea joan, urtea etorri barruan daudenak? Hogeita zortzi urte-eta! Baten amak lehengo batean esan zidana: «Gure Jexux Mari! Haginetan hau, bizkarrezurrean hura...!».

Gaur egun, gure gurasoen esana datorkit gogora: «Zuek gazteak zarie eta ikusiko dozue bueltia!». Haiek egoerak noiz buelta emango bizi izan ziren. Nik pentsatzen nuen ikusiko nuela *buelta*, baina ez dakit noiz etorriko den. Ez dago erraz.



## NIKOLA TELLERIA SOPELAKO ANDER DEUNA IKASTOLAN

Olatz Barrenetxea eta Josu Barbariasen testigantza

«NIKOLA TELLERIA JAUNAK ETA MARIANO JAUNAK Sopelako elizpean emandako doktrina klaseak izan ziren lehen urratsa. Hura, baina, indar handia hartuko zuen egitasmo baten hazia izan zen. Javier Legarrak eta Iñaki Barrenetxeak herriko beste hainbat pertsonaren laguntzarekin eginiko lanari esker, duela 40 urte sortu zen Ander Deuna Ikastola. Gaur egun egitasmo handia da. Olatz Barrenetxea eta Josu Barbarias, biak ikasle ohiak, zuzendaritzako kideak dira. Biek azaldu digute ikastolak egin duen bidea.

(...)

**Urteak adina aldaketa dira... Nolakoa izan zen hasiera?**

Etxez etxe, baserriz baserri dirua jaso eta bazkideen bila hasi ziren, baita umeak topatzen ere. Eskolak eman ahal izateko tokia ere behar zuten, eta Nikola Telleria apaizarekin hitz egin zuten. Helburua Elizako atzealdea, San Antonio izenagaz ezagutzen duguna, uztea zen. Baietz erantzun zien apaizak, eta hor hasi zen ikastola. Nafarroatik, Arano herritik etorri zen Begoña Zabala andereñoa. Hori izan zen 1968an gure lehenengo andereñoa, zuzendaria... Hasieran zazpi ume hasi ziren, baina apurka-apurka ume gehiagok eman zuten izena, eta ikastaro horretan azkenean 15 haur batu ziren.

Sopelako herritar askok begi onez ikusi zuten egitasmoa eta hurrengo ikasturteetan handitzen joan zen izena emandakoen kopurua, eta elizpera joan behar izan zuten. Han ere leku gutxi zeukatenez, pisu bi erosi ziren bertan aritzeko. Hori ere berehala txikia geratu zen, eta hortik atera behar izan zuten. 1974. urtean gazta fabrika bat zegoen salgai, eta hori erosi behar zela pentsatu zuen garai hartako batzordeak, gurasoen oniritziarekin. Erronka handia zen. Sekulako lana egin zuten, martxoan erosi, apirilean obrakaz hasi eta irailerako prest zegoen. 156 ume hasi ziren egun ikastola dagoen leku berean.

(...)

**Joan den hilabetean 40 urte bete dituzue.**

40. urteurrena urriaren 4an izan zen, zehazki. Ospakizun ekitaldia egin genuen. Ordubeteko saioan 40 urteko laburpena egin genuen, bideo bat ere atera dugu eta haren zatitxo bat aurkeztu zen. Lehen promozioko ikasle-guraso, andereño, sortzaile eta herriko gazteei omenaldia egin genien, guztiak inplikatu baitziren ikastolaren hastapenetan. Guztiei Ikastolako Keramika Taldeak egindako oroigarria eta DVDa oparitu genien. Bertsolariak aritu ziren, Udaletik, Hezkuntza Sailetik eta Ikastolen Elkartetik zenbait lagun etorri ziren, eta hitz batzuk eskaini zizkiguten. Egundo izan ditugun presidenteak eta zuzendari guztiak omendu genituen. Xabier Amurizak ere, Nikola Telleria gogoratzeko hitz batzuk esan zizkigun, berarekin azken urteak eman zituelako Zamorako kartzelan. Gero hamabitakoa eta bazkaria egin genituen, festa-eguna kantuketan amaitzeko» (*Ander Deuna Ikastola, 25 urte*; 1998).



## PABLO MUÑOZ:
## NIRE EGONALDIA ZAMORAKO KONKORDATU KARTZELAN

MARTUTENEKO KARTZELATIK ZAMORAKO KONKORDATU Kartzelara 1969ko abuztuaren amaieran eraman ninduten, «errebelamendu militarraren» akusaziopean Zalditeria Saileko auzitegi baten aurrean aurkeztu eta haren gerra-kontseilu *sumarísimo*ak epaia eman eta egun batzuetara. Epaiketa hura ateak itxita egin zuten, akusatuen artean bi erlijioso geundela aitzakiatzat hartuta: ni neu, garai hartan fraide kaputxinoa, eta Felipe Izagirre, orduan frantziskotarra. Sei urteko kondena ezarri zidaten, ETAko ekintzaile bati ofizialki leporatzen zitzaion heriotza bat –Bilboko taxilari batena– ezbaian jartzen zuen orri baten zabalkundearen erruduntzat jota (ETAk sinatua zetorren orri hori).

Epaile instruktore militarra zen Lasanta komandantearen bidez Martuteneko kartzelan jakinarazi zitzaidanez, nire prozesamendua eraginkorra bihurtu zen Donostiako elizbarrutiko gotzainaren, Jacinto Argaia jaunaren, «administrazio isiltasunaren» ondorioz, zeinak ez baitzion erantzun epailearen derrigorrezko errekerimenduari, konkordatuak xedatzen zuen arabera erlijiosoen prozesamendurako. Gotzainak, nire erlijioso-nagusiei azaldu zienez, «ez zuen eman baimenik» nire prozesamendurako. Horixe zen garai hartan gotzainek zuten estrategia: ez erantzutea ez baietz ez ezetz, baina «admi-

nistrazioaren isiltasuna» gu epaitzeko erabateko baimentzat jotzen zuten epaileek, konkordatua aintzat hartu gabe.

Gotzainen jarrera horri, berriz, botere frankistarekin «*connivencia*» iritzi zioten apaiz-kartzela berezi hartan preso zeuden erlijiosoek; izatez, Zamorako kartzelan nengoela, Bilboko gotzaina zen Jose Maria Cirardaren bisitan egon nintzen, zeini apaiz gipuzkoarrek gure kide bizkaitarren gutun bat eman genion. Bizkaitarrek beren gotzaina hartzeari uko egin zioten eta gutunean torturak salatzen zituzten, atxilotuak izan eta gotzainak bertan behera utzi ondoren pairatu zituzten torturak, hain zuzen. Jacinto Argaiak ere bisitatu gintuen eta gipuzkoarrok bai hartu genuen hura, baina jasandako torturak eta tratu txarrak salatzeko eta epaile militarren aurrean izan zuen isiltasun harekiko gure desadostasuna adierazteko baliatu genuen bisita hura.

Nire erlijioso-nagusiei dagokienez, harremana hotza izan zen, zenbaitetan gogorra eta salatzailea ere bai, baina, oro har, gizabidezkoa iritzi nion. Nagusi ez nituen gainerako erlijioso gehien-gehienen jarrera, berriz, insolidarioa izan zen.

Preso-lagunekin izan nuen harremana, gazteena neu nintzela kontuan hartuz, ona izan zen, nahiz eta begien bistan zegoen, logikoki, batzuen eta besteen konpromiso maila ezberdina, baita ezarritako kondenen diferentzia. Bereziki gozagarriak ziren uste sendo eta idealen adierazpenak, hala eguneroko bilera *liturgikoetan*, nola gaueroko desfile *abertzaleetan*, azken hauen gidari Nikola Telleria beteranoa genuela. Esan bezala, desberdintasun handia zegoen batzuen eta besteen artean: apaiz bizkaitarren Gogor taldea, apaiz kataluniar erdi-anarkistak, Jon Etxabe ia mitikoa, Periko Solabarria ez gutxiago mitikoa, Garcia Salve apaiz langilea, Briñas kaleko jesuitak... Alde handia, beraz, batzuen konpromiso eta militantzia aukera zabalaren eta beste batzuen duda-muda desengainatuaren artean. Protesta ekintzak ez ziren beti aho batekoak, ez eta berdina gure arteko konfiantza maila, nahiz eta bakoitzaren jarrerekiko begirune handia egiaztatu ahal izan



nuela nabarmendu behar dudan. Urtearen amaieran, dozena bat apaiz preso deportatu gintuzten komentu edo erlijio-etxeetara, bertako abade edo nagusien zaindaritza eta erantzukizunaren pean kondena betetzen jarraitzeko. Niri dagokidanez, aitortu behar dut Zangozako komentuko fraide gehien-gehienak benetako kartzelari bezala portatu zirela nirekin.

Zamorako kartzela konkordatarioan egin nuen egotaldi labur hura eta bertan metatutako oroitzapenak ez dira sekula ezabatu nire memoriatik.

## PATXI BILBAO:

## GOMUTA BIZIAK

Patxi Bilbao

*Berbaldi bat eta... badator nire bide larria.*
Odisea

JAZOKIZUN BATEK IZAN ZUEN IKUTUA neurea eta artzain-lanarena zen bizitzan. (1964ko) Iraillaren 2. eguna zen eta Gamizen zaindari zuten San Antolinen jaiak ziren. D. Kristobal bertako parrokoak dei egin zidan egun horretan berbaldia egiteko. Heldu zen berbaldiaren ordua eta, berba-lekutik metro bira, lenengo jesarlekuan, Erriko Udal-Batza zegoen, alkatea aurrean zutela. Herriko banderea bazeramaten, baina hau ondo estalduta zeukan Laterriko banderak.

Berbaldia hasteko, bare-bare itxaron nuen elizako isiltasuna oso-osoa izan arte. Gero esan nuen:

«Eliza sinistedun guztiok otoitz egiteko batzen garen tokia da. Horregaitik, elizaren barruan sobran dagoz banakuntza sortzen duten ezaugarri guztiak. Bakoitzak kalean agertu ditzala bere pentsaerak eta bere ezaugarriak. Eliza alkartasunaren eta otoitzaren tokia da eta, horregaitik, hemen sobran dagoz estutasunak eta banakuntzak sortzen dituzten ezaugarriak».

Ziur nago inork ez duela gogoan izango gertatuta eroan nuen berbaldia, baina ziur bai gogoan izango dabezela bereztasun arduratuagaz niri irten zitzizkidan esaldi haiek.

Lenengo aurkian zeudenek, batez ere alkateak, bere gorputzari eragina egin zion aurkian, «bere gizontasunaren gorputz-ezaugarrietan bertan» ardiren batek pika egin balio legez.

### 4.3. Gabriel Aresti. Oskorri Gaitz teatro kantatua Larrabetzun (1972)

«Oskorri Gaitz» izeneko teatro kantatua jokatu eben Bilboko «Oskorri» taldekoek Larrabetzun, abenduaren 31n. Teatro kantatu honetako hitzak Gabriel Arestik egin ditu, eta irudiak Agustin Ibarrola pintatzaileak. Hauxe izan da teatro berezi honekin egin daben lehenengo jardunaldia (*Anaitasuna*, 1972).

### 4.4. Gabriel Aresti (1975)

Larrabetzuko / hiritar / eta / lagunak:

(...)

Zer sufritzen duten / hoiek. / Nik eta zuek hain ongi ezagutzen ditugunek: / Naberan Naberan / eta / Naberan Naberan / eta / Amuritza / eta / Mario, Itziar, Xabier... (...) (Aresti, 1975).

### 5. Patxo Unzueta (1984)

La influencia del clero en la sociedad vasca se asentó, durante los 40 años, en dos pilares fundamentales: su apoyo a la contestación social y política al régimen y su protagonismo en el terreno cultural, en particular en el campo de la lengua vasca. La contestación al régimen tuvo dos fases.

Hasta 1960 se expresó mediante cartas colectivas de denuncia (como la enviada en 1944 al Vaticano), la publicación clandestina de *Egiz*. En el periodo posterior se hizo patente en el desarrollo de los movimientos apostólicos y en la participación conspirativa directa en las filas de la oposición organizada. El papel de la JOC y la HOAC en el desarrollo del nuevo movimiento obrero de Euskadi, simbolizado por el auge de Comisiones Obreras a partir de 1962-1963, es hoy unánimemente reconocido. El papel de su equivalente rural –Herri Gaztedi, juventud popular– en la extensión del nacionalismo radical, simbolizado por ETA, a amplias zonas, en particular de Guipúzcoa, a partir del primitivo embrión bilbaíno es también evidente. A partir de finales de los sesenta, numerosos curas pasaron ya directamente a militar, y a veces orgánicamente, en las actividades políticas antifranquistas, en particular como infraestructura de ETA.

(...)

A mediados de los cincuenta, el País Vasco estaba a la cabeza del ranking de práctica religiosa en España. En Vizcaya, según un estudio del sociólogo francés M. Boulard, el 40% de los ciudadanos cumplía con el precepto pascual (confesar y comulgar por Pascua florida). El porcentaje era del ciento por ciento en localidades rurales y semirrurales, como Durango y otras. Aunque no existen datos precisos, se considera que hoy cumple el precepto dominical entre el 5% y el 10% de la población, como mucho. Todavía en 1966 se ordenaron en Bilbao 32 nuevos sacerdotes. Diez años después, la cifra se había dividido por cuatro. Actualmente, la media es de una ordenación al año. En 1960 cursaban estudios en el seminario de Derio 649 aspirantes a la ordenación. Desde 1979, la media anual es de unos 40 seminaristas. La edad media de los sacerdotes vizcaínos en activo supera actualmente los 55 años. Tales son los datos de la crisis.

El periodo 1968-1969 constituye el punto de máxima tensión entre el clero de base y la jerarquía. El obispo de Bilbao, Pablo Gurpide, suspendió de su ministerio, en octubre de 1968, a 60 sacerdotes que se habían encerrado en el seminario para denunciar la represión franquista y solicitar la dimisión del prelado. Este fallecería en medio de la crisis, contribuyendo a aumentar el dramatismo de la situación. Durante el encierro nació el grupo Gogor (firmeza), llamado a tener una gran influencia social en el futuro. En 1969, seis curas encerrados en huelga de hambre en el obispado serían detenidos por la

policía y condenados (por rebelión militar) a penas de entre 10 y 12 años de cárcel. Unos meses después, en vísperas de la jornada de amnistía del 2 de noviembre de 1969, se firmaba en París un documento contra el régimen en el que aparece como signatario, junto al PCE y ETA, el «colectivo de curas vascos».

Gran parte –seguramente casi todos– de los miembros de aquel colectivo, como de los del grupo Gogor o de las decenas de ellos que a partir de aquella fecha cumplirían diversas condenas en la cárcel especial para clérigos abierta por el régimen en Zamora, abandonaría los hábitos a partir de 1970. Los ex curas constituyen hoy un grupo no sólo numeroso, sino muy influyente en el País Vasco, en particular a través de su presencia en los medios de comunicación ligados a la izquierda abertzale y en el campo de la enseñanza de la lengua vasca (Unzueta, 1984).

## 6. Piarres Larzabal. Euskaldun apez presoen amak doatzi Batikanorat

Anai Artea sortzean (1969ko uztaila), izendatu gintuzten lehen buru Monzon, diruzain Arregi, idatzkari Juan Mari apeza eta ni. Juan Marik ez baitzazkien ez euskara eta ez frantsesa, gure idatzlana zatikatzen ginuen. Harek espainolezkoak eta nik gaineratekoak.

Urte hartan, behin ere baino ugariago ziren espainol poliziaz preso hartuak eta torturatuak. Nola baitzen euskaldun apez multxo bat preso Zamorako espetxean, erabaki zen apez horien amak joanen zirela Batikanorat. Aita Sainduari salatzerat hemen gaindi nola gobernatzen ziren Francoren «estado katolikaren» zerbitzariak. Itxaropena zen bide hortaz munduari jakinaraziko zaizkola nehork guti aipatzen zituen euskaldunen pairamen okaztagarriak. Ama horien gidatzeko, Erromarat horiekin joan zen gure Juan Mari Arregi. Batikanon hartu zituen monsinore batek eta galdegin zioten egon



ziten erantzunaren beha, noiz aita saindua ikusten ahalko zuten. Bizpahiru egunen buruan monsinore bera azaldu zitzaioten erranez aita saindua lanez itoa zagola, ez zituela ikusten ahal eta ordainez, ama horietarik bakotxari igortzen ziotela arrosario pare bat.

Ama horiek asaldatu ziren holako erantzunez. Monsinore hari ihardoki zioten ez zirela jinak arrosarioketarat, bazituztela berenak (hauk irakutsi ziozkaten), bainan aita sainduarekin mintzatzerat. Gehiagorik gabe eta batere arrosarioak hartu gabe, gure amak urrundu ziren Erromatik.

Ez da segur, aita sainduak jakin zuela ere ama horiek bere ondotik zabiltzala. Gauza bera gertatu zen aita sainduarekin 1937an. Batikanorat joan ziren euskaldun diputado batzu, Euskadiko gorabeherez mintzatzerat, berekin zeramatela diosesako buruzagiek eman diru puska bat, elizetan bildua, zerga bezala, Batikanoa laguntzeko. Monsinore batek zerga onhartu zioten bainan ez zuten ukan aita saindua ikusteko baimenik. Alabainan holakorik ez zuten nahi kuriako espainol kardinale handi-mandi batzuek.

Halere, bertze bide batez, euskaldun apez abertzale batzuek, Paulo VIgarrenari Ginebran izan zelarik, eskutik eskurat pasa zioten idatzi luze bat, esplikatuz zer zen gertatzen espainol poliztei eta presondegietan.

Zonbait egun geroxago, mintzaldi batean, aipatuz Angola eta Espainia, aita sainduak atera zuen abilki, bi nazio horietako gertakizunek bihotza zauritzen ziotela.

Hori entzunik, Francotiarrak erotu ziren. Igorri zuten protesta egiterat Aita Sainduaren ganat, beren Italiako embaxadorea. Hunek Paulo VIgarrenakin ukan zuen elkar-hitzketa ez omen zen izan gozoa.

Nere aldetik, Anai Artearen idatzkari bezala egin nuen protesta eta frantses agerkari katolikoetarat bidali, erranez ezin onhartua zela, Batikanoan gertatua.

Alabainan, agerkari horiek egun bertsuetan kondatzen zuten, argazkiak azalduz, nola Aita Sainduak buruz buru

hartu zituen espainol torero famatu bat eta mundutiar neskatxa dantzari bat. Nolaz beraz ez zituen onhartu gure apezen amak! Nere protesta ez zuen nehork azaldu.

Gure apezen borroka beren apezpikuekin:

Urte hartan, jada erran dugun bezala, hanitz apez gazte eta apezgaiek ihes egin zuten Euskadi Hegotik Iparrerat. Ez zitazken egon hortaz kezkatu gabe heien eliz buruzagiak. Horra nola guganat etorri ziren horietarik zonbait, gure bidez harremanetan sartzeko beren menpeko iheslariekin.

Beren joera zen apez eta apezgai horien laguntzea diruz eta abar, ahalaz seminerio batean biltzea eta holako.

Bainan apezek gogor egin zioten: ez zutela beren obizpoen ganik, karitatea igurikatzen, bainan protesta gogor bat, munduari salatuz Espainian zer gertatzen ari zen.

Obizpo horiek arras hurbildik bazazkiten tortura eta gainerateko pairamenen albisteak. Bainan ez ziren atrebitzen protesta egiterat. Hortaz, lehen aldikotz, Bilboko eta Donostiako obizpoek, zabaldu zuten idatzi bat 1969ko azaroan. Huna zertzu zioten: «Dakigularik holakorik ez dela legez aizu, zurrumurru batzuek diote preso batzu torturatuak direla. Hori gezurra bada, zuzen kontrako propaganda litake gobernuko zerbitzari batzuen aurka. Ahatik ez da errex jakitea nork dion egia eta nork gezurra».

Obizpoen ixiltasunak eta idatzi horrek izigarriko kaltea egin zuten fededun kartsuenetan. «Artzainak joko ditut, dio Ebanjelioak, eta ardiak barraiatuak izango dira». Otsoak arditeian sarturik, mutu eta makila baliatu gabe dagon artzainak, «artzain» izenik merezi ote du!

Ez da harritzeko asko apez eta apezgaiek ez balinbadute jasan holako frogapena. Noizbait azalduko da Euskadiko Elizaren kondaira Francoren denboran. Haren irakurlea eskandalaturik geratuko baita igartuz zoin buruzagi ahulak izan dituen gure euskal Elizak Francoren garaian (Larzabal, 1996).



## 7. ETA eta EAJk Derioko seminarioko itxialdiaz

Horrela jaso izan du Anabella Barrosok (1995, 289-290): El encierro fue favorablemente acogido por fieles y sacerdotes que secundaron material y moralmente a los recluidos en Derio. En numerosas homilías se habló de los curas del Seminario o leyeron desde el púlpito las hojas informativas publicadas por los encerrados. Los 60 de Derio recibieron adhesiones individuales y colectivas (...).

Incluso grupos políticos apoyaron con escritos la acción de Derio. El PNV secundó incondicionalmente los objetivos del encierro, sobre todo por haber conseguido «exponer ante la opinión mundial la situación angustiosa del pueblo vasco, dar alivio y esperanza a los pobres perseguidos y oprimidos; renovar y ampliar la toma de conciencia del pueblo en general».

Hojas clandestinas de ETA recogieron, con un estilo muy similar al del texto sacerdotal enviado a Roma, los mismos principios que el Documento de los de Derio.

«Nos encontramos con una Iglesia del Pueblo que vive al margen del mismo y que es utilizada por el Estado fascista para dirigir y controlar al Pueblo. Vemos un Concordato casi feudal, bonachón, paternalista, que defiende la legalidad del sistema. Una Iglesia que no vive la pobreza y prácticamente impotente ante la condena de opresión e injusticia en que vive el PTV. Por ello la actitud de los sacerdotes trae al PTV un rayo de esperanza. El PTV carente de una amplia y objetiva formación e información intuye la autenticidad evangélica de estos sacerdotes y los apoya. Comprende que exigir los derechos del PTV no es hacer política. Sabe que denunciar la opresión que sufre el PTV está en auténtica línea sacerdotal. Creemos que ellos responden a lo que debe ser la Iglesia auténtica. Por todo ello, un NO a la Iglesia española y un sí a los sacerdotes de Derio».

«Euzko Alderdi Jeltzalia'ren B.B.B-'k» euskaraz eta gaztelaniaz ateratako ohar batean zera zioen: «(...) Derio-ko semi-

nario barruan sartuta geratzera bultzatu ebazan (...). ekintza onen asierak asko poztu ginduzan, arreskero arduretan bizi izan gara, eta abadeok gure lotsa ona ta txaloak dabez. Euskalerri onen seme onenetarikoak dira» (J. Agirreren artxibotik. Oihartzun gehiago in Ibarra, 1971 eta Alday, 1986).

## 8.1. Zamorako apaizak, Mario Onaindiak dakarrenez (2001)

Cinco sacerdotes vizcaínos, que se habían destacado anteriormente en acciones de protesta como el encierro en el seminario de Derio, protagonizaron algo similar en el obispado de Bilbao en el que protestaban por las torturas que se nos estaban infligiendo. Fueron detenidos y procesados por el fiscal militar y a los pocos días juzgados a puerta cerrada y condenados a penas desorbitantes. Naverán y Gabika, hijo de José, que había sido polizón en el barco en que viajó mi abuelo Manu a Estados Unidos y hermano de leche de mi abuela, fue condenado a doce años; Amuriza, cura de Gizaburuaga, Kalzada y Tellería y Julen Madariaga (*sic*), a diez. El juez militar consideró que el manifiesto que hicieron público era un llamamiento a la sedición y a la rebelión militar. De estas condenas cumplirían ocho años, ¡ocho años por una huelga de hambre! Lógicamente sembró la alarma entre nosotros, no solo por la indignación que despertaba, por la brutalidad que representaba, sino porque nos hacía temer lo peor para nosotros.

(...)

El siguiente en declarar fue el sacerdote Julen Kalzada, quien anteriormente había sido condenado a diez años por llevar a cabo una huelga de hambre en protesta por las torturas. Su abogado era Pedro Ibarra Güell.

Manifestó que su apostolado estaba dirigido «especialmente a la juventud, para que se diera cuenta de los problemas del hombre, del pueblo en que viven, de la nación, de la etnia,



de las opresiones sociales»; por ello prestaba su casa, «porque mi casa pertenece al pueblo». No le constaba que en ella hubiera reuniones de ETA, pero si hubiera sido así se habría alegrado «porque es la que más está trabajando y haciendo más al servicio del pueblo y estaba trabajando más que cualquier organización por la liberación de todas las opresiones, económicas, políticas, culturales y religiosa». Consideraba que «la ideología y las acciones de ETA son las mejores porque ha hecho el análisis más objetivo de la realidad, y por lo tanto sus soluciones son las mejores y sus acciones las más eficaces. ETA es actualmente el movimiento que mejor ha comprendido al pueblo vasco».

Expresó sus motivaciones religiosas: «Son del Nuevo Testamento: Jesucristo ha venido a traer la liberación de los pobres y los oprimidos, el mensaje para que liberemos nosotros a los pobres y oprimidos. [...] La Iglesia es el Pueblo de Dios. La Iglesia, de palabra, está con los pobres y oprimidos, pero en realidad está con los poderosos.» Denunció la alienación del pueblo por la jerarquía eclesiástica.

(...)

La sesión acabó con el sacerdote Jon Etxabe, de treinta y siete años, cuyo abogado era Camiña, y, como en el caso de Kalzada, trató de mostrar que su actividad en ETA era compatible con el sacerdocio; dijo que antes quería ser misionero, pero que la solidaridad internacionalista de ETA colmó sus ansias misioneras; también se había dado cuenta de que no se podía trabajar eficazmente contra la división en clases dentro de la Iglesia, aunque ésta contara con organizaciones del tipo de la JOC, HOAC, etc. Denunció a la oligarquía porque no le interesaba la cultura vasca. Manifestó que me vio en comisaría y pudo comprobar las torturas que había padecido (Onaindia, 2001).

## 8.2. Naberan, Mario Onaindiak dakarrenez (2001)

(...) nosotros habíamos hecho simplemente una parodia del funeral de Txabi convocado por su familia. Sin embargo, había pueblos en los que se había celebrado funeral, sobre todo los que tenían un párroco posconciliar, y sí se habían producido importantes manifestaciones: en Algorta, en Larrabezua, donde el cura Naverán había arengado a la feligresía en tonos patéticos... nos sirvió para elevarnos un poco la moral (Onaindía, 2001).

## 9. Konkordatuaren bukaera, Gregorio Moranek dakarrenez (2003)

(...) Un sector de tan alto peso como la Iglesia vivía en el País Vasco una radicalización más acusada que la de otras zonas de España. La comunicación clero vasco-pueblo vasco era ya anterior al Régimen de Franco, hasta el punto que el apoyo de la Iglesia vasca al nacionalismo los había colocado junto al Frente Popular en la guerra civil; la expresión exacta sería decir juntos, pero no revueltos, lo que de por sí echaba por tierra el carácter de Cruzada que Franco quiso darle.

En noviembre de 1968 explotaron las tensiones acumuladas en el clero vasco por la ofensiva del Régimen contra la sociedad. La violencia hacia los párrocos que aceptaron funerales y misas por Txabi Echebarrieta fue la gota que desbordó el vaso. «*Los sufragios* –escribía el gobernador civil de Vizcaya en nota pública– *podrán celebrarse con la presencia exclusiva de los oficiantes*», a lo que añadía el de Navarra: «*lo inadmisible es que con distintos pretextos, inclusive sobrenaturales, se trate de equiparar a un asesino con su víctima...*». Como en el editorial de *El Correo* de Bilbao, se orinaban sobre los cadáveres de Echebarrieta, García Lorca y los rojos camborios del mundo entero.



Después de las sanciones a varios párrocos, aceptadas por el obispo de Vizcaya, monseñor Gúrpide, sesenta sacerdotes se encierran en noviembre del 68 en el seminario de Derio. Fue un gesto lleno de valor que tradujo ante la opinión pública la ruptura de la Iglesia con el silencio cómplice. El peso de la Iglesia en Euskadi le daba al encierro mayor relevancia (...).

La actitud de los encerrados en Derio causó una conmoción de envergadura estatal. Ya no era sólo el hecho de que algunos sacerdotes se inclinaran hacia el nacionalismo, de que algunos párrocos, como el de Gámiz, se negaran a que la bandera española entrara en la iglesia –«*dentro de la iglesia*, dijo, *no tienen cabida símbolos de desunión*»– o que los de Santa Teresa (Baracaldo), Amorebieta, Sodupe, Ondárroa, Baquio... no pagaran las «multas gubernativas»... que el de Gorocica no inaugurara locales el 18 de julio... o que el coadjutor de la Sagrada Familia de Bilbao apelara a la inviolabilidad del domicilio... Esta vez se trataba de algo más fuerte, que ni el Estado ni la jerarquía eclesiástica tenían fuerza para achicar. Desde 1966, e incluso antes, los sacerdotes habían ido construyendo una mínima organización que se caracterizaba por dos rechazos –el sistema político franquista y la jerarquía eclesiástica– y una evidencia: Euskadi como país oprimido.

El encierro de Derio expuso esto ante la opinión pública. Durante una semana, los sesenta encerrados se mantuvieron cantando canciones vascas. El obispo Gúrpide, muy enfermo ya, fallece mientras sesenta símbolos repudian su trayectoria de doce años y medio de colaboracionismo entre la Iglesia y la Dictadura.

Le sustituye José María Cirarda. Al tiempo, en San Sebastián, ocupa el Obispado Jacinto Argaya. Es más que un cambio de nombres. Cirarda, vizcaíno de Baquio, tenía 51 años. Argaya, de Vera de Bidasoa, catorce más. Desde noviembre de 1968 se puede decir que el Régimen se ha enajenado la cobertura de la Iglesia para justificar sus actos de homenaje, sus magnas conmemoraciones o sus castigos beneméritos. El

poder del Estado en Euskadi será desde 1968 laico y anticlerical; curiosa paradoja. No hará falta que pase un año para que el Gobierno decida la detención del vicario general de Bilbao, José Angel Ubieta, y entonces la animosidad se convertirá en *casus belli*. En 1970 la Iglesia vasca no cobijará la celebración de la liberación de Bilbao.

El aislamiento social del Régimen se concentró en una suicida complacencia en la represión. De qué valían los chistus, los curas, las cofradías y los vascos, si ellos tenían las Fuerzas de Orden Público, los tribunales y el dinero del Estado. Nunca como en 1969 se reprimió tan a mansalva. No se trataba de una organización. Se reprimía a los vascos, se castigaba a los vascos y se encarcelaba a los vascos. Los centenares de detenidos en marzo-abril de 1969, algunos de los cuales comparecerán como acusados en el Proceso de Burgos, se sorprendieron al comprobar el odio de algunos policías al detenerlos. Durante el interrogatorio o la tortura no se referían a ETA sino a «los vascos». Y es curioso que ellos, que tantos panfletos habían escrito sobre los *txakurras* (perros) policiales, comprobaron que su inquina era teórica, distante, histórica... pero que quienes golpeaban, empezaban a hacerlo desde que pronunciaban los apellidos –Onaindía, Dorronsoro, Gorostidi, Arana, Aizpurua...–, y seguían cuando confesaban que les gustaban los chipirones y el chacolí (Moran, 2003).

## 10. Apaizak, Teo Uriartek dakarrenez

Volví a Bilbao a media mañana, y me encaminé a la casa de Luchana donde mi amigo Peli, seminarista, vivía con otros y un cura, Juan Mari Lechosa. Me escondí allí, haciéndome pasar por seminarista, en una situación de vigilancia policial bastante estrecha, porque en Vizcaya regía el estado de excepción a cuenta de la huelga de Laminaciones en Banda de Etxebarri.



La situación política era difícil. La gente pasaba mucho miedo con el estado de excepción, pero también nuevas generaciones, nuevos sectores sociales, como cristianos comprometidos –lo era el líder de la huelga de Bandas, Osaba–, sacerdotes, seminaristas y frailes, se unían al tradicional movimiento obrero de Vizcaya (*Trabajadores*, 1968). Todo eso cuajaba luego en una serie de grupos y grupúsculos, más o menos organizados, generalmente muy radicalizados y solidarios con el resto, que permitían ir perdiendo el miedo paralizante al régimen que durante muchos años se había padecido. Los seminaristas ni se inmutaron por aquel bicho raro que se presentó allí a dormir. Debían de estar bastante acostumbrados ya. De hecho, me llevaron al día siguiente a una comuna de jesuitas, muy cerca de la plaza de los Fueros de Baracaldo, que era una de las bases para el desarrollo de la huelga.

(...)

Creo que fue el pequeño de los Narbaiza, al que por entonces le habían puesto de nombre de guerra *Txaho*, el que me sacó de la casa de Txabi. Me dio una vuelta turística por toda la costa vizcaína, que estaba a rebosar porque era un domingo de julio, y me llevó a casa del párroco de Murelaga. Se llamaba don Emilio, y era un sacerdote ya mayor que había sido capellán nacionalista en la Guerra Civil y que, curiosamente, seguía manteniendo su compromiso político. No es que todo el clero vasco fuera uniforme y pronacionalista. Mis amigos de Luchana habían llegado a ese compromiso más por las nuevas doctrinas del Concilio Vaticano que por influencia política familiar. Pero se estaba dando una confluencia que tendría ciertas consecuencias.

Don Emilio, como los curas que estuvieron con el nacionalismo en la guerra, era en lo religioso y lo social muy conservador. Creo que en la relación patria-religión eran incluso integristas. Pero se acomodaban bien a los nuevos tiempos. Se consideraban más progres que el clero holandés, y creo que lo que aportaban los viejos a los nuevos curas era su radica-

lismo y su apuesta por el compromiso político, cosa no tan evidente en los despertados por el concilio. Así que de nuevo me encontré en los brazos de la iglesia, haciendo evidente que los lazos con los sacerdotes comprometidos ofrecían la mejor infraestructura a los que estábamos metidos en estas aventuras (Uriarte, 2005).

## 11. Apaizak, Itziar Aizpuruak dakarrenez (2006)

«Euskal Herrian, 60ko hamarkadan Elizak zerikusi handia izan zuen abertzaletasunean, eta abertzaletasunak elizkoiengan. 1967tik 1969ra, fraideak eta apaizak zutabe nagusietakoak izan ziren militanteen eginkizunetan, eta haietako asko ETAko militante ere bihurtu ziren» (Aizpurua, 2006).



# BOSGARREN ATALA
## Dokumentazioa

FRANCISCO FRANCO BAHAMONDE JAUNARI
TA
ESPAÑAKO GAURKO GOBERNUARI
ESKUTITZ AGIRIA

1.967'KO JORRAILLAREN 21'N Referendunetik lau illa betegarrenean ain zuzen be, Españako gaurko Gobernuak Bizkairako «Ley de Excepción» deritxona jartzen dau.

## Gertaerak

Arrezkero Bizkaiko erria nora ezik aurkitzen da, zearo bildurrak jota ezpadago. Poliziak, lege orrek damotson lasaitasun eta zigor-gabeaz baliaturik, etxerik etxe ate-joka diardu. Etxe oneik erru bakar auxe dauke: persona batzuk bizi dirala bertan, politiku-ekintzalle edo langille-aurrelariak, ustez guztiz bidezko diran auzi batzuen alde burrukatzera kontzientzi bizi batek beartzen ditunak. Etxeak arakatzen be, susmoa zan bezela, ustekabean ari dira, batzuetan gañera goizaldeko ezorduetan.

Egunez naiz gabaz, odozein ordutan detenituak izan ondoren, eunetik gora guraso baketsu edo politiku ta langille mugimenduetako ekintzalle gazte, espetxeratuak izan dira illabeteren barruan. Gero oi bezelako itaunketa-saillak eragin yakez. Egia esan, polizia ontaz, personaren dintasunari aurreragokoetan baño begirune geyago izan deutso oraingoan.

Gertaera oneik astunaguak dira oraindik, zuribidetzat jarritako akusaziñoak zeaztasunik gabeak edo apropos naastuak izan dirala kontuan euki ezkero. Sumariorik ez ezer barik –noiz edo noizkoren baten izan ezik–, laneko edo politikako naaste batzuk sortutako susmotxo bat izan da naikoa espetxeratzerik bidegabezkoenak egiteko.

Orrez gañera, detenitutakoekin pastoral-artuemona dauken abadeai be eginkizunik aurrena betetzea eragotzi egin yake, alegia, bisitatzen joatea. Ajentek eurak autortu dabe Madrilletik ortaz galerazpen berezi bat izan dala.

Jokabide negargarri onegaz ase eziñik-edo, agintariak beste zakarrago batera jo dabe oraindik: deportatzera. Berrogetazak izan dira Españan zear an-emen sakabanaturik egonak, noiz arteko plazurik izentatu barik edo jakiten emon barik beintzat, Caceres, Soria, Valladolid, Segovia, Cuenca, Zamora...

Lurralde oneik geyen batez oso pobreak dira ta bertako emigrazioak naikoa agirian damosku ango barri: lana urri, ordain-sari motzak eta beraz ezerez gorria deportatuontzat. Gizon oneik edozelako delituz kondenatutako gaizkilleak bezela deportatu dabez. Eta au arrigarria: senar emazte batzuek alkarregandik banandurik, bata an bestea emen, aldendurik euki dabez.

Deportatuen etxekoai ezelako argitasunik ez segurantzarik etxake emon, bueltarako egunik ez plazurik etxake izentatu, ta noiz izan leiteken antzemateko datorik be ezta izan. Orrela, etxekoen bizipidea estutu egin da, –famili asko barriz deportatuen irabazi utsetik bizi dira–, baita alako larritasuna sortu be gero zer izango ete dan ezin somaturik.

Len lez orain be, metodo onein alderdirik garratzena gizapersonaren dintasunari begirunarik ez izatean dago. Izparingi, irrati, telebisio ta gañetiko informazio guztiak be gaizkide izan dira ortan, gertaera guztiok eta biziro zapalduak izandako gizon onein izen eta lumeroa ixilpe osoan gorde dabezta. Informazioaren mutukeri ori, Bizkaiko trajedia estaltzean,



ainbeste aitatutako Prensa-askatasunari egokiegi dagokionik ezin esan leike.

## Zergaitik guzti au?

Zuk eta zure Gobernuak erabaki ori artzeko, zeuen baitako arrazoiak izango dozuez nunbait. Baña geuk be, gure eginkizun berezi batez besteen eta batezbe nekepean dagozanen arazo ta arduretera edegiak gagozan ezkero, izango al dogu eskubidea oraingo situazio au sortuarazi daben sakoneko arrazoiak gure ustez zeintzuk diren agertzeko.

Lenengo ta beiñ, oñarriko arrazoi bezela auxe jartzen dogu: Españako gaurko Estaduak personaren aurrenengo eskubideak erabiltzea luzaroan galerazita dauka. Izan be Españako Estaduko erritarrak, ogetamar urteren barruan, askatasunez alkartzeko biderik eztabe izan, ez politikazko ez profesiozko elburuetan. Dagoan sindikato bakarra, ezarria ta ezelako errepresentaziorik bakua, ezerez utsa agertu da langillen benetako aldezpenaren aurrez, ta sindikato orren «babespean» bizi diranak eurak be, egunean baño egunean argiago ikusi dabe langille gendeak ditun egizko arazoen kaltegarri besterik eztala.

«Movimiento Nacional»aren bijentzi bakarra giza-askatasunaren aurka dago, ta mogimendu orren legeekin batera ez datozan politika-eretxi bidezkoak, legezko itz-biderik emoten ez jaken ezkero, nai ta nai ez ixilpean jokatzera bearturik aurkitzen dira.

Gizarteko artuemon-bide guztiak Rejimen-zale utsen eskuetan dagoz. Orrela espresio-askatasuna, baita edozein alkarrizketa onurakor be, eziñezkoak dira,

Personaren gauzarik barrenkoi ta sakratuena, alegia, bere kontzientzia, erlejio bakar baten ezarpenez zauritua dago. Itz batean, argi ta garbi dago Españiko Estaduko erritarrak zelako zapalkuntzaren mende bizitzera beartutik dagozan.

Baña geure kasu konkretuari oraturik, Peninsula barruan diran erririk berezienetariko bat osotzen dogula ezin ukatu. Eta ontaz, Bizkaya, agindukeriaren aldetik bereziki kolpatua izan dala salatu bearrean gagoz: Euskalerriari buruz aukerabide bat euki al izatea ukatu ez-ezik, benetako euskal-kultura batera eltzeko ate guztiak zearo itxita dagoz.

Españiko lege-ontolaketa onek gure erria alde batetik noreztu ta buruarindu egin dau, baita bestetik langille ta politiku aurrelarien talde jator bat sortuarazi be.

Talde oneik euren programak aldeztutzeko ta zabaltzeko legebiderik eztauken ezkero, gizarte ta politika arazoetan tenka-tenka jokatzera bearturik aurkitzen dira.

Auxe da gure ustez «Ley de Excepción» orren sustraiko arrazoia. Ez, ostera, lege orren zurigarritzat agertutako naasketa-giro dalako ori. «Naasketa» orreik Bizkaian enpresa konkretu bateko langilleekin gure Erriak izan dauan alkartasun zabalaren agiriko ezaugarri besterik eztira izan.

Langille oneik, erri osoa errez kargutu zan bezela, defentsa aren bitartez, len azaldutako gizarte ta politika antolaketaren gatxak agirira atara ebezan, antolaketa ori kapitalismoaren errokoa ta kapitalismoari bakarrik serbitzekoa da-ta.

«Ley de Excepción» ori bide zuzenetatik garaitzera etorren borroka itotzeko jarri zala siñisturik dago Bizkaya. Oraintxe be indartsuak makalena azpiratu egin dabe, Bakea sendatu bearra atxakitzat jarri arren egotez euren onari bakarrik begira dagoz-ta.

## Ondorenak

Esandako guztien ondoren bezela, Bizkaiko gure Erriak dituan zauriai begiratu ezkero, benetako erri-ilketa bat eztanik ezin esan. Erri baten ilgarri da, izan be, detenituz, deportatuz, ta erbesteratuz, dituan aurrelaririk jaioenak kentzea. Eregillerik bizienak eta arduratsuenak aldendu ezkero, erri



xea gainbera dator, ikaraz eta zapuztua; geldotu ta ajolagabetu egiten da, politika zitalaren erreminta samur biurturik. Itz batean, dollortu egiten da.

Erri xee onek, moral-euzkarri barik aurkitzean, kontzientzi naasketa izugarriak sufritzen ditu, arazo zuzen batzun alde borroka diarduenen jokabide zintsoa zapuztutzen Gobernu bat ikusirik.

Bien bitartean kapitalismoa geroago ta gizenago, Gobernuak, oraingoan batezbe, zigorraren bildur barik, edozeiñ giza-promozio itotzeko errezbide guztiak emon deutsoz-ta.

Bear bada galdezka jarriko zara zergaitik abade talde au oraingo egoera auzian jartzera ausartzen dan.

Erantzuna argi daukazu: besteen zerbitzurako gizonak izateak beartzen gaitu ortara.

Jarritako gertaerak eurak eta gure ustez zeiñ arrazoitan sustraitzen diran eta ze ondoren dakarren ikustea bera zan naikoa eginkizun astun ori sentitzeko.

Baña oraindik geyago daukagu. Oraingo egoerak oztopo latzak jartzen dauskuz erri oneri Ebangelioa iragarteko. Zuzengabezko situazio bat martiriorako edo onoimen arrigarriak pratikatzeko egoki izatea baleiteke. Baña egoera ori Estadu konfesional eta katolikutzako batek eta Eleizeagaz batbatera jokatzen dauala autortzen dauan batek probokatzea, ulertu eziñekoa da.

Egoera ontan Erriak Eleizeari leporatzen dautsoz agintarien utsak eta geyegikeriak, eta agintariekin batera bera be kideko ta errudun jartzen dau. Izan be, eztogu ulertzen lagun ta laguntzalle autortzen dan Aginte baten zuzengabekeriak zelan ixilpean estaldu leikezan, zelanbait bere jokokide biurtu barik. Eleizeak, bere osotasuna zaintzeko, ots egin bearrik aundiena ementxe daukala uste dogu, ixilkeriak arrisku zakonago auxe baitdakar: kristau kontzientzi beraren deformazioa. Era onetan, itz lerro oneik Jaunaren Erriaz zenbaterañoko ardura sentitzen dogun agerpide besterik eztira. Oraintxe ulertu zeinke zergaitik zugana joten dogun, alako amurrualdi ta

indar-giro ontan, eginkizun au guztiz arriskugarri yakula jakiñik. Muturra nun sartzen dogun konturatzen gara. Baña aitatutako gertaerak eta gure erriko situazio lotsagarri ta norabako au ikustean, gure samin-deadarra ta uko-garraxia zuganaño jaurti barik ezin geratu.

Gure idazki onek orixe beste sustrairik eztauka eta emen doakizu nekepean dagon Erri bategaz eta erri ortako batzuekaz batezbe, bat-batera gagozala agertzen deutsugularik. Izenpetzen dogunon asmo zuzena onartua izango al da zure aldetik.

BILBON, 1967´ko Bagillak 25

1.967´ko Bagillaren 25´an Francisco Franco Bahamonde Jaunari ta Españako gaurko Gobernuari Bizkaiko abade ta praille talde batek bialdutako eskutitz agiria izenpetzen dot.





NOTA DEL GOBIERNO CIVIL DE VIZCAYA

Teniendo en cuenta que los sufragios que se han celebrado hasta la fecha por Francisco Javier Echevarrieta Ortiz, uno de los asesinos del guardia civil de Tráfico don José Pardines Arcay, convocados por la organización subversiva ETA a través de propaganda clandestina difundida con gran profusión vienen degenerando en actos de marcado cariz separatista; este Gobierno Civil, que no desea inmiscuirse en que los actos religiosos puedan o no celebrarse se considera en el deber de prevenir la asistencia de público a los mismos, a fin de evitar que se repitan alteraciones del orden, con las lamentables consecuencias que de ello puedan derivarse.

En su consecuencia, se advierte a cuantos intenten aprovechar estas circunstancias para exteriorizar sus ideas contrarias a la unidad de España, provocando alteraciones del orden y de la pacífica convivencia social, que aquellos sufragios podrán celebrarse con la asistencia exclusiva de los oficiantes, y que serán dispersados por la fuerza pública por los procedimientos más adecuados a las circunstancias quienes intenten asistir a tales actos como incursos en los supuestos previstos en los artículos 13 y 14 de la vigente ley de Orden Público de 30 de julio de 1959.

Bilbao, 4 de julio de 1968. El Gobernador Civil: GUILLERMO CANDON CALATAYUD.

Multa a un coadjutor de Larrabezúa

Ha sido sancionado por la Autoridad gubernativa con una multa de 25.000 pesetas el coadjutor de la parroquia de Larrabezúa, don Jesús Naverán Naverán. En la comunicación que se le ha cursado se le dice que su actitud implica una invitación al incumplimiento de las disposiciones dictadas por la Autoridad para guardar el orden y un intento de alterar la paz y la convivencia social. La citada sanción le ha sido impuesta también por las frases que pronunció en la homilía dominical del pasado día 7, en la que censuró el proceder de la Autoridad y justificó la actuación de terroristas de la ETA lo que, al decir de la notificación que se le ha enviado, «supone solidarizarse con el separatismo, la subversión y el crimen».

Este sacerdote (que el domingo día 14, fue suspendiendo las misas de ocho y media y diez y media de la mañana y cinco y cuarto de la tarde, obstinado en oficiarlas por determinada intención y con asistencia de fieles, sabedor de la prohibición de asistencia en tales casos por los desórdenes ocurridos en casos análogos en San Antón de Bilbao, Ondárroa, Bermeo, etc.), el domingo último ha vuelto a hacer lo mismo y anunciado a la feligresía y a las propias autoridades que lo volverá a intentar el jueves, día 25, y el domingo, día 28.

En fin, todo esto sólo nos mueve a compadecerle (garaiko prentsan agertuak, J. Agirreren artxibotik jasoak).



## PAULO VI.A AITA SANTUARI
## (DERIOKO ITXIALDITIK)

*Zuzengabetasunaren aurrez aurka urten barik, borrokan egin barik gelditzea, ezta ez gizakor eta ez kristau.*
Saliège kardinala

ERROMAKO ERANTZUNAREN ZAIN, DERIOKO seminarioan alkarturik dagozen irurogei abadeen jokabideari buruz prensak esandako guzurren eta egindako iraiñen ostean, pentsatzeko da batzuri gatx egingo jakiela *gure arrasoi bakarra gure erriaganako ta eleizaganako* maitasuna izan dena ta dala onartzea. 1960 eta 1963garrenean markatutako bidetik eta euskal-abadeek beti ibillitako bidetik goiaz batasun indarrak eraginda eta kontzientzi osoz: «bere aurrerakuntza eta giza-bizitza kontrolaturik eta frenaturik aurkitzen dan gure erriaren egoera» kondenatzen da. Gaur egun, egoera au larritu egin da, «represiño batek (amenazak, kartzelatzeak, tortura bildurgarriak...) ondamendira eroan dauzalako euskal etnia ta Euskal Erriko Langillearen kulturea».

Azken urteetan egindako legezko ekintza asko (dokumentuak, ekintza pastoralak...) ezeren ondore positivo barik zapalduak eta ixilduak izan dira; sarri askotan egurra izan da erantzun bakarra.

Gure ekintza, ondo dakigu, apartekoa da, ezta normala izan. Baña onen arrasoia eleiz institusiñoan aurkitzen da, abade ta erritarren errepresentasiño efektivorik onartzen ez dabelako.

## Zertarako gure ekintza

1. Gure Euskal Erriko Langilleak bizi dauan zapalkuntza piztutzeko. Euskal Erriko Langillea. E.E.L. ezda emoten emen definisiño politikorik, gizatalde batzuren azalpen sotilla baño. Izen orregaz, auxe esan gura dogu: bateko ta besteko giza taldeak (bertokoak eta kanpotik etorriak). Au da:

a) Ekonomiku indarrak babesten eta laguntzen ez dauazanak. Au da, makina kapitaldun eta estatalaren mende dagozanak.

b) Erriko estruktura politikuak babesten eta laguntzen ez dauazanak. Au da, gizartearen zuzendaritzan benetako parte eraginkorrik ezdaukienak (Alkartzeko eskubideak, politiku eta sindikal eskubideak, prensa ta kultura eskubideak, erlejiño eskubideak...).

2. Gure eleiz instituziñoari arpegira botatzeko berak parte artzen dabela E.E.L.aren zapalkuntzan eta egiazko errudun dala esateko.

a) Ekonomiku indarraren babesean bizi dalako. Indar ekonomiku orren babespean egoteak xixtema ekonomiku kapitaldunaren morroi egitea dakar, bere bizi-molde ta kriterioen azpian egon bearra. Ekonomiku onura ezaugarrienak onexek dira: Ekonomiku laguntza, kontribusiñorik eza, estaduak berari zuzendutako presupuestoak...).

b) Politiku indarraren babesean bizi dalako. Indar politiku onen babespean egoteak eleiz estruktura fasista ta militarista dan sistema politiku onen esaneko biurtzen dau. Esandakoaren ondore ezaugarrienak onexek dira: Gotzainak aukeratzeko modua, Gotzainak estaduko buruari, bere gobernu ta legediari egiten dautsen juramentu-itza; Kristau printzipioak eta etikoak ezarririk dagoan situasiño bateri makurtu bearra; sistema ta sistema onek jokabideak moralki ta berez ontzat artzea eta, ondorioz, berarenganako fideltasuna ta kristau begirunea eskatzea; eleizari dagokiozan arazoetan polesiari eskubidea emotea... eta azken ondoren lez, eleizaren



ixiltasun pekatari bat Agintaritzan dagozenen zapalkuntza politiku eta ekonomikuak dakargiguzan gizonaren kontrako gora-beretan.

3. Gure eleiz institusiñoari esateko bere pekatua auxe dala:

a) Erriak ez daukozan pribilejio ekonomiku ta politiku batzuetaz baliatzea.

b) Pribilejio oneik euskal erriko langillearen interesa ta bere aurrerakuntzearen kontra erabiltzea.

## Gure ekintza eleizkoia da bakar-bakarrik

Gure ekintzak alertazko dei larri bat izan gura dau, kobersiñorako dei bat kristau guztiontzat, emen eleizan, zapalkuntza eta injustiziazko egoera onen pekatuan konpromituturik garan guztiontzat. Dei bat bakotxaren eta guztion konbersiñora, eta batez be jerarki mallan dagozanentzat, eurek dirazelako publikoan eta zuzen zuzenik errepresentatzen gaituenak.

Beraz, gure ekintza *ezda politika*, eleizari dagokiona baño. Ostera, *despolitisatu* gura da eleiza bere gaurko konpromisuekandik, erritarrago egiteko ain zuzen be, bere balioak lantzeko eta bere giza errealidade guztien serbitzari izateko.

Orregaitik, eleizako atalkide guztiei eskatzen dautsagu artu dagiela postura ebajeliozko bat, egin dagigula indar guztiok lortu dagigun:

a) *Eleiza pobre* bat: eleiza pobre bat gura dogu, eta ez bakarrik diru gora beran, batez be bizitzaren aurrez daukan portaeran baño. Pobrea giza indarretan aseguratu barik, pobreen eta zapalduen ondoan dagoana, Jangoikoa dalako bere atx eta eskudu. «Euskal erriko kristauok morroi izan gura dogu gure erri morroiagaz batera, ezer barik gura dogu gure erri ezer bakotuaz».

b) *Eleiza dinamiku* bat: oraingo loturetatik azkatua gura dogu. Gure munduan ia erneta edo ernetzen doazen indar

eta balio guztiekin postura bizi bat artu dagiela, ta era batera postura bizien zaintzalle izan daitela. Giza mogimentuen serbitzari eta garbitzalle izan daitela gura dogu eleiza, konprometidu daitela mundua zuzenago ta anaikorrago eginguraz dabizen gizonen alegiñetan, eta ez daitela izan giza-familia ots-otsean eta kanpotik ebasten dauan jueza.

c) *Eleiza libre* bat: librea ez bakarrik kulturari buruzko askatasunaz, giza indar eta konpromisuekandik librea dan eleiza gura dogu batez be. Bere pekatuetatik azkatu-gurako eleiza nai dogu, izan daiten Jainkoaren eta Gizonen arteko bide garbi bat.

d) *Eleiza indijena edo bertoko* bat: gura dogu Euskal Errriko Langillearen historian eta martxan eta alegiñetan sustraiturik dagoan eleiza bat. Eta olan enkarnatu bear au exijentzi bat da, ez bakarrik edozein personentzat, baita gorputz eleizkoiaren organisasiño ta estrukturentzat be. Olan, eleiza berez dan lez agertuko da: Kristoren misterioan kristau erriak egunez egun bizituz doan lez, salbasiñoaren eta barruko ta kanpoko askatasunaren misterio lez (bakotxaren eta guztion pekatuen askakatasuna lez). Bere lege ta bizitza, Kristoren antzera, gizonenganako maitasuna izango da, bere giro ta giza egoera konkretuetan. Gizonenganako maitasun konpremetituak Jainkoagaz alkartuko gaitu. Eleiza, beraz, esan doguzan karakteristika oneikaitik, eta gaur fasista ta militarista dan sistema zapaltzaille onen barruan bizi dalako, auxe izango da:

a) Zapalkuntzaren salatzalle profetiku; au da, euskal erriko langilleari falta jakozan giza eskubideen salatzallea.

b) Gizarteko klaseen salatzalle, eleizaz faltsoki aprobetxatzen dirazelako pribilejio ekonomiku ta politikoei esker biziz, kontzientziaren ardura barik. Batez be, emen, «euskal kapitalismoa» salatzen dogu, erriaren saltzalle dalako ta orregaitik, arrasoi lotzagarri ta zapaltzalle.

d) Euskal Erriko Langillearen aldeko portaera artuko dau:



–Bere giza eskubideak eskatzen ditu (azkatasuna, partisipasiñoa; enpresa erriak kontrolatzeko eskubidea, bardin tarteko organismoetan eta estaduan).

–Bere eskubide politikuak eskatzen ditu (alkartzeko eskubidea, prensaren eta kulturaren eta hizkuntzaren eskubideak...).

–Eta, gañera, gaur euskal erriari ukatzen jakozan eskubide batzuk eskatzen ditu, au da, bere eskubide eta eginbearretan etnia talde lez osatu ekiñean galazoten jakozan eskubide orrek.

## Zelan asiko dan gure eleizaren aldakuntza ori?

Ez dogu uste gaurko eleiz jerarkiak aldatzea bakarrik naiko izango danik; uste dogu *portaera baten aldaketa bearrezkoa dala*, espiritu baten konbersiño bat, bai estrukturetan eta bai onen barruan dagozen personetan. Danok alegindu bear gara iñori serbitzen estruktura askatzalleak sortu dagiguzan. Aldaketa onen portaera dala bide, auxe eskatzen dogu eleizbarruti mallan:

– Administradore apostoliku bat bere aginte efektibu bategaz, bakotxaren eta guztion konbersiñoa zuzendu dagian.

– Gotzainaren aukeratzean erriak parte artzea. Eleiz barrutiko aldaketa oni euskal erri osorako gotzain batzorde bat sortzeak jarraituko dautso, eta bera eleizaren ezaugarririk aundiena lez izango da euskal erriko langillearenganako serbitzuan eta enkarnasiñoan.

Olan ordainduko dau orain arteko kaltea, euskal erriko benetako ta berezko errialidadetik kanpora eta kontra dagozen Muga ta Planteamentuak ontzat artu dituelako orain arte. Euskal Batzorde Nagusi onek beste errietako batzordeekin anaikiro lan egingo dau guztioi dagokiguzan arazoetan.

## Oharrak:

–Cure pentzaera ta planteamentua obetoago ezagutzeko guztiz premiñazkoa da gure dokumentoa ezagutzea.

–Zabaldu egizu!!

Derion, 1968ko azaroak 11

(*Euskadi eta Askatasuna*, II, 263-265. Bada beste aldaera bat, euskaraz, frantsesez eta gaztelaniaz, *Gogor* diskarekin batera. Eta 3. aldaera bat itxialdian izaniko J. Agirreren artxiboan, eta euskaraz eta gazteleraz. Berbera in Placer, 1978).





OBISPO BATEN ERIOTZA BETI DA MINGARRI kristiñauentzat. Baña gure Obispoa ilteak, Eleizbarrutia daukagun moduan eukita, asko be zer pentsau geiago dakar Bizkaiko kristiñauentzat.

Eriotz au dala-ta, gure Erriko jente askok pregunta auxe egingo dabe bear bada: Zergaitik 60 abade orreik ONDIÑO BE Seminarioan sartuta jarraitzen dabe?

Ona emen gure erantzuna: guk egin doguna eztoa Pablo Gurpide (goian bego) Obispo Jaunaren kontra ain zuzen. Gure pentsamentu ta elburua zuzen-zuzen, jerarki ta erri, Eleizako estruktura osoaren aurrez-aur eginda dago, Eleiza ebanjeliozkoago bat egiteko KONBERSIÑORA deituaz.

Obispoaren esate ta egiteen kontra agertu garean guztian gure Erriari obeto serbidu eion laguntzearren izan da.

Orain Obispoaren eriotzak Eleiz-malla guztietakoai, jerarki, abade ta laikuai, geure burua aztertuazo bear deusku, iya gure egitekoak zelan bete doguzan ikusteko: Nortzuk omisiñoz edo ezagaitik uts egin dogun, nortzuk zintzotasunik ezagaitik, ze asmo ta interesez urreratu garean Jerarkiagana, iya Jerarkiari Erriaren serbitzuan lagundu dautsogun ala geure modura erabilli dogun.

Obispoaren eriotza dala-ta, guk, 60 abadeok, azterketa bat eginda gero, auxe agertu bearra daukagu:

1) Seminario barruan jarraitzen dogula, gure Obispoaren kontra ez giñoiala garbi izteko. Gure pentsamentua auxe zan eta auxe da: guztiokan KONBERSIÑO-GOGO BAT sortzea, batez be kargu jerarkikurik aundiena daukenakan.

Gañera, periodikuak-eta ainbeste guzur zabaldu ta gure arrazoiak atzekoz aurrera ipiñi dabezan ezkero, orain beingoan kanpora urtetzeak, gure ustez, bide geiago emongo leukio interpretaziño oker orreri, gu Pablo Obispo Jaunaren kontra gengozala bakarrik antza emonaz.

2) Eleiz-estruktura guztien garbiketa bat eskatuaz gañera, gure jokabidea kristau-erri osoari zer pentsau emotera doa. Danok daukagu zer ikusia Eleizeagaz, bai bere onagaz, bai bera txarragaz. Orregaitik, gu emen jarraitzeak, kanpora urtetzeak baño mesede geiago dakarrela uste dogu, kristiñauai beste azterketa sakonago bat egiten lagunduko deutse-ta.

Une ontan, baretasunez eta zintzotasunez artu daigula bakotzak geure eginbearra. Auxe izango da gure kristaumaitasunaren erakutsirik onena ta gure Obispo gendun Pablo Gurpideren alde, Aita Jaungoikoari egin geinkion erregurik bikañena.

Derioko Seminarioan, 1968'ko zemendiaren 18

IRUROGEI ABADEAK

(Carmelo Maronen artxibotik jasoa. Gaztelaniaz ere).





## 1. ¿Zergaitik sartu gintzan?

«Injustiziaren kontra protestau barik eta burrukan egin barik gelditzen dana ezta ez gizon ez kristau» (SALLIEGA kardenalak esana).

Seminarioan onetakoxe sartu gintzan: Gure Euskalerri Langillea gizartez, diruz, politikaz, kulturaz eta endaz zapalduta dagola agirian ipinteko.

Eta gañera, gure Erriaren zapalkuntzan Eleizako erakundeak be erru aundia daukala agirian ipinteko.

Era batera Ebanjelioaz baterago daon Eleiza bat eskatzen gendun:

POBREA, diruz, eta pobreen eta zapalduen alde jokatuko dauana.

LIBREA, bere buruaren jabea, ta ez diruaren ez indarraren menpekoa.

BIZIA, eragillea, gizonai aurrera egiten lagunduko dautsena, ta Zuzentasunaren eta Anaitasunaren billa jokatuko dauana.

BERTOKOA, Euskalerrikoa, jakintzan, izakeran eta ekintzan.

Eleizak olantxe bakarrik beteko dau bere zeregiña.

Eleiza au konbertiduten asteko, Erromako Aministradore bat eskatzen gendun, urrengo Obispoa aukeratzeko, Erriak parte artuaz. Baita Euskalerriko Obispoen Batzorde edo Junta bat be, onen bidez Eleizak gure Erriko arazoei obeto erantzun dagitsen.

Ekintza au apartekoa izan da, ainbeste urtean egindako alegiñak alperrekoak izanik, legetik eta normaletik zeregiñik ezegola ikusten gendun-ta. Zigorra ta egurra besterik eztogu artu.

Erriak zer egin dogun barik, ZEGAITIK EGIN DOGUN ikusi bear dau.

## 2. ¿Zegaitik egon gara eusten 25 egunean?

Gurpide Obispo Jauna ilda be, ez gintzan urten. Gu ez giñoian joan be Gurpide Jaunaren kontra, Eleizako erakunde osoari aurrea emotera ta Kristau-Erri osoa itxartzera baño.

Erromako Aministradorea etorrita be, barruan gelditu gintzan. Gure artuemonetan onen etorrera pausu bat aurrera izanarren, gu lengoan. Pausu bat aurrera zan, bera eldu baño ez, gu ikustera etortea (bera izan da lenengo etorri yakun nagusia), eta gañera esan euskun seminariotik urtenaz batera kenduko euskula lengo Obispoak ezarritako zigorra.

Aministradore Jauna etorrita gero be, gaur arte emen egotea onexegaitik izan da:

–Gure arazoa barruan gagozanon goraberatxo bat bakarrik eztalako (zigorra kendu edo ez kendu). Auxe da bear doguna; benetan eta alkartuta Eleiza jatorrago bat egiten asi, Eleiza Pobrea, Librea, Bizia ta Euskalerrikoa.

–Erriari ikusiazo gura geuntson Erromako Aministradore bat etortea ezala dana konpontzea, ezta gitxiagorik be. Auxe da bearrezkoena: Bera, bere inguruko ta gañetiko guztiok konbertidu gaitela, Eleiza diruaren eta indarraren azpitik askatzeko.



–Aministradoreari egite batzuk eskatzen geuntsozan, Euskalerriak Eleiza noz edo noz bere alde jarri dala siñistu al dagian.

Ona emen eskatzen geuntsozan egite batzuk:

–Egingo diran batzordeak demokraziz izentatzea. Orretako batzorde oneitan euskal eta langille-arazoetako abade ta erritarrik jatorrenak sartu bear dira, alderdirik pobreenak eta zapalduenak eurok dira-ta.

–Periodikuen joko loia salatu ta kondenau daiala.

–Gaurko errejimen politiku ta sozialaren gatxak agertu daizala.

## 3. ¿Zer atara dogu?

–Lenengo ta bein, geuk be eskatzen dogun Eleiza ori egiten asteko gogo biziago bat daukagu. Eta orretako jokabide argiago ta gogorragoak artu bearko doguz.

–Gure Erriko zati aundi batek be begiak zabaldu dauz (Gipuzko, Nafarroa, Araba, eta Bayonaldea). Zapalduta dagola, ta Eleizak berak be orretan erru aundia daukala ikusi dau, baita guztiona dogun Eleiza onek garbitualdi eder bear dauala be.

–Pobreen eta zapalduen biotza be pixkat onegaz nasaituko al zan.

–Era berean, Peninsulako errietako ainbat lagun gure jokabideaz batera agertu yakuz.

–Guk agirian esan doguna, goietan be oso ondo artua izan da: jakitunak, teologuak, lege-gizonak, abogauak, etabar.

–Erromak Aministradore bat beingoan bialdu dausku.

–Erroman be orain, gura badabe beintzat, badakie nor garan eta zelan gagozan.

–Azkenez, mundu guztian zear zabaldu da gure egoera garratz onen barri.

Eta gogoan izan, Españako Obispoak gure jokabidea txartzat bota arren, Madrilleko Nuntzioak eta Erromak ez

kirikino jarri izen.
Hori hala den, alderantziz den
tximino buztana naizen
hara amarauna eltxoz iruna
armiarma jauna gizen
jango nituzke zenbait barrabil
Madrilen eta Parisen.
11)
Aizak, ispilu, esak egia
gure irudi al haiz hi?
Geriza horri al deritzote
izadiko jaun nagusi?
Gizaki ala mamu hondarrak
zer garen ezin berezi
sabela ari ez balitzaigu
orroe eta garraisi
dudan geundeke gure galtzetan
ba ote den inor bizi.
12)
Aitak bizarra amak bularra
umea bien haragi
milaka jende eta abere
lur iraulketan da ari.
Pozik geundeke gure ekintzak
dela urri nahiz ugari
zotz baten garrik balio ezarri
burruka osoko suari
nahiz bi metroko zulo bat gero
izan gure azken sari.
13)
Pentsa ez pentsa garunak dantza
hortzak hortzari darauntsa
badugu gose aina umore
betetzeko sabel hutsa.
Uhinak hegan, izarrek edan



bizirik goaz goruntza
ilargia eror, baleak irents
gorpu da gure gorputza
hala ez bada, jaun Luziferren
alaben altzoan gautza.
14)
Hamasei egun hamalau bertso
hamaika goseri eutsi
erdi hil-bizi labeak utzi
bi hankadun sei burduntzi.
Oraingoz, jaunak, hau bukatu da
luze nahiz labur iritzi
geratu zaigun biziaz agur
maite gaituen anitzi
hilik ikusi nahi gintuztenei
barka eta mila goraintzi.

Carabanchelgo kartzelako eritegian astebete eginik, lekualdatzea iritsi zen eguneko goizean, bakoitza bere furgoian, animoso irten ginen Madrildik, nora ez jakinik, baina preso politikoekin nahasiko gintuzten segurantza osoan. Bakoitzak beste lagunen berririk ez genekiela, konturatzen ginen, letreroetatik, iparrerantz gindoazela. Beraz, Madrildik beherakoak deskartaturik, Goi Gaztela, Galizia, Aragoi edo horrelako destinoren bat izan behar zuen. Kilometroak igaro ahala, ostera, Valladolid, Salamanca eta abar, itxura hartzen hasia zen amesgaitza (ea berriro Zamorara garamatzaten!) gorpuztuz zihoan, eta azkenean, konfirmazioa. Berriro Zamoran! Gure garaipen sentsazioak astebete aurreragoko ziegetan ehortzi ziren. Hori gertatzen bazen, gose-greban jarraitzea erabakia genuenez, berriro zuloan, berriro lehenean, baina oraingoan, garaipenerako itxaropen handi gabe. Sorta honetan, egoeraren dezepzioa eta amorrua bortizki nabari direla esango nuke. Bertsoen tonua, estiloa, irudiak, baliabideak, errimaz gainerako simetriak, dena doa egoeraren dramatismoa indartzera. Ez zen fikzioa. Egoera bera zen halakoa.

## Conflicto en la Orden

*Al pasionista Pascual Insausti*

¡Buena la armaste, Paskual,
el día en que de tu cárcel
los novicios pasionistas
se informaron sin ambages!

La juventud de tu orden
resolvió tan duro trance,
no sin doloroso esfuerzo,
dando un gran paso adelante.

Y como no están del todo
dispuestos los pobres padres
a trasmitir a los jóvenes
sus imprevistos pesares,

contigo identificados
los noveles estudiantes
han adoptado por lema
dos pareados de alcance:

«Si pascual es pasionista
seguiremos en la lista.
Mas, si la Orden le condena,
de ella saldremos sin pena».

Pero en vez de dialogar
los muy reverendos padres,
con error han apostado
por repeler el ataque
de la subversión novicia,
poniendo otra pica en Flandes,
con una contraconsigna
que así replica en romance:
«Si Pascual es pasionista
que nos borren de la lista;
si quiere ser misionero,
convierta a sus carceleros».

Dividida está en dos bandos,
hasta hoy irreconciliables,
la Orden de la Pasión,
sin que medie un arbitraje.

Un gran duelo ha comenzado
entre novicios y padres,
de un embravecido lago
como guerra entre las márgenes.

¿Qué suerte, pues, correrá
Pascual, al pisar la calle?
¿Qué ruta podrá emprender
su comprometida nave?



Querer darlo por sabido
desconociendo las bases
de un hipotético acuerdo,
es jugar al disparate.

Mejor es dar tiempo al tiempo,
y tras salir de la cárcel,
esperar a que Pascual
negocie, decida y hable.

Hasta entonces, pasionistas,
olvidaos de las listas.
Luego, a fuer de misioneros,
sed con vosotros sinceros.
Cárcel de Zamora
15 de octubre de 1970

(Gamo, 2001).

GURE ERRIAK DARAMAN GURUTZ-BIDEA, ezta samurra. Beren askatasuna ta bizi-aukera, merkeegi salduta, inoren odolik ixuri gabe, or ditugu ainbat errukarri, urte luzetarako katepean sartuta. Bitartean, gurasoren bat il zaie ta il-zorian zeukaten aita edo ama ikusteko, eragozpen aundiak sortu zaizkie. Ala il zitzaion, pare bat urte dala, bere aita Amuriza apaizari. Oraintsu, *Kaltzada Julian* apaizari, beronen ama il zaio; ta azkenik, Gabikagojeaskoa´tar Alberto apaizari, aita il zaio. Irurei, il-zorian zeukaten gurasoa ikusteko, berdin-samarreko eragozpenak jarri dizkiete. Guk emen, kartzelan ditugun abade jator oiek aaztu ez dakizkigun, Gabika adiskidearen gertaerak zabaldu nai genituzke.

Burdinaz estekaturik

Alberto'k bere ama Primitiba izenekoa du ta aita Joxe izenekoa. Bederatzi seme-alaba izan dituzte, eta joan dan Maiatzean, gure apaiz errukarriari, bere aita il-zorian jarri zitzaion. Il baiño len aita ikustea itxura zala-ta, aitaren gaitz ori benetakoa ote zan jakiten, or ibilli ziran agintariak. Ala zala, ba, ta aita ikusteko ordubeteko epe laburra emanaz, or daramate seme apaiza Lekeitio'ra. Semea etxera orduko, aita zerraldo otzean sartua zuten.

Eldu da seme mindua aitaren gorputz-aurrera, ta jarri zaio ildakoari belauniko izketan. Semearen itzak, biotza urratzekoak benetan. Erri osoa apaiza besarkatu nairik, alkarri bultzaka. Polizia alboan lotsatuta.

Apaizaren arreba bat mariñel batekin ezkondua ta mundu asko ikusia. Arek eraso zion polizari, esanaz:

–Zuek, an Zamora'n, nere anai au gaiztotzat joko dezue; baiña emen, ezagutzen duten erritarrak nolako arrera egin dioten, ikusi dezu.

Polizak erantzun omen zion: «Egia esaten dizut, nere lekuan baiño zure anaiaren lekuan egotea, naiago nukela».

Arrebak ostera: «Orduan, beronen esku-muturreko burniak, zergatik ez dizkiotzu gizajoari kentzen?».

Eta poliziak erantzun: «Ez didazu sinistuko, baiña lotura oiek askatzeko giltzarik ez didate eman».

Herri osoa guardiz inguratua

Aita, Maiatzaren 28'an il zan, eta illetak, urrengo egunean, Maiatzaren 29'an egin zizkioten. Ordubeteko epea bete zanean, apaiza erriari agurka, ta erri guzia sutan, apaizari goraka ta txaloka ta «Gora Euskadi!» oiuka. Orra gertatua. Gure erriak kontu auek gogoan izan ditzan beti, emen dijoazkitzue bertso batzuek.

Apaiza Lekeitio'n egon zan bitartean, guda-ontzi bat itxasoan Lekeitio aurrean egon zan, eta erri osoa guardiz inguratua euki zuten. Eragabekeri auek ikusirik, ez gaitezen kartzeletako gure anai-arrebei laguntzen aspertu.

Bertso auen doiñua, Xenpelar sonatuak Berriotxoa donearen bizitza kontatzeko artu zuana, alako bertso aietan: «Aita ta ama Bizkaian daude, semea il da gaixoa...». Ikasi ta kanta zazpi Euskalerrietan, gure jendeak egun garratz auek gogoan artu ditzan.

«Gabikagojeaskoa'tar Alberto, apaiz eta euskal-martiri».



1
Seme apaiza kartzelan dute,
Zamora'n urte luzetan;
Lekeitio'ko errian dago
Aita azken-arnasetan.

2
Aitarengana utzi diote
Etortzen abadeari;
Esku-muturrak katiatuak
Utzirik, ain lotsagarri.

3
Aita zerraldo otzean dago
Semea etortzerako;
Aitaren gorputz-aurrean jarri
Da semea belauniko.

4
Alberto, seme errukarria,
Asi da aitari izketan;
Ingurukoak, ari entzunda,
Urtu dira negarretan.

5
Nork esan ango negar-zotiñen
Biotz-intziri samiñak?
Nork neurtu ango jende onaren
Malko agortu eziñak?

6
Erri osoa sutan jarri da,
Apaiza laztandu nairik;
Polizi bera lotsatan dago
Arrera ura ikusirik.

7
«Naiago nuke –esaten dio
Apaizaren arrebari–
Lotura oiek kendu lenbailen
Zure anai minduari».

8
«Baiña sinistu zaidazu, arren,
–naiz gauza gogorra izan–
Loturak aska al izateko
Giltzarik ez didate eman».

9
Erri guziak beso-zabalik
Artzen du apaiz zintzoa,
Itxaropenez gozatu nairik
Aren barruko giroa.

10
Ordubeteko epea izan du
Apaizak aita ikusteko;
Besterik gabe eraman dute
Giltzapean usteltzeko.

11
Katetan dauden gure anaiak,
Gogora ditzagun beti;
Euskalerriko sua pizteko
Oiek ditugu illeti.

12
Gabikagojeaskoa degu
Euskalerriko martiri.
Apaiz jatorrak ar beza gure
Esker onaren agiri!

(Etxaniz, 1974).





A LOS CURAS PRESOS EN ZAMORA

Cárcel medieval canónica
en Zamora legendaria.
Cárcel para curas vascos
–«vascos de piedra blindada»–
castellanos y gallegos,
que quebrantaron sus calas,
asturianos, catalanes,
fieles a su historia brava.
Curas de Evangelio y Mundo,
curas que rompen y rasgan,
curas que en serio tomaron
la responsable palabra
que corta la vieja carne
con el filo de una espada.
Palabra que ahuyenta el miedo,
la mentira desgarra,
que al odio lo deja inútil
y el miedo desenmascara.
Palabra que anuncia el gozo
y solo en amor acaba.

Curas que el pueblo los sigue,
les preceden o acompañan,
por riscos de dura lucha
y por celos de esperanza,
al tribunal y a la cárcel,
a la muerte o a la plaza.
...
El ayuno de estos curas,
curas de idea y de rabia,
con la conciencia muy limpia
y con la frente muy alta,
en protesta clamorosa,
es voz de profeta, airada
que hace temblarse los tronos
de los cuatro enanos sátrapas
montados sobre el dinero,
montados sobre la trampa,
sobre la espalda del pueblo,
sobre la sangre de España.
Es penitencia también,
por tiempos de historia amarga,
en que nuestra madre Iglesia
fue can de boca cerrada
al servicio de la orden
de gentes de hierba mala.
...
Curas presos en Zamora,
con vuestras fuerzas ya flacas
esperad, que estamos muchos
en las puertas, en las vallas,
junto a vosotros, dispuestos
a terminar la batalla.
...
Que la cárcel de Zamora,
–una de tantas y tantas–



es ahora para el mundo
la cárcel donde está España.
La cárcel del Concordato
que ha muerto herido de espalda.
La cárcel de muchos años
de una Iglesia cortesana,
aduladora, orgullosa,
cómplice y concordataria.

¡Esa cárcel será pronto
santuario de acción de gracias!

Nabarra, 27.11.73
La risa del Pueblo.
(Testu anonimoa da; nahikoa zabaldu bere garaian, batik bat Nafarroa Garaian. Martin Orberen artxiboan).

## 5.1. Francisco Franco Bahamonderi 1967-6-25ean egindako gutunaren sinatzaileak

Francisco Bilbao
Larrauri'tar Martín
Balier'tar Alexander K.O.
Alberto Gabikagogeaskoa
Teodoro Darquistade
Luis Mª de Laibarra
José Luis Izaguirre
Julian Uriarte
Anastasio Munarriz
Emilio Azarola y Sangroniz
Román Bilbao
Juan Antonio Losada
Jesús Sánchez
Luis Amiano
Pedro Solabarría
Alfonso Carlos Beraza
Jesús Echebarría O.F.M.
Jesús Barandica
Luis Mª Bereciartúa
Sabino Manuel Loroño
Martín Goicoechea
Jesús Naberán

David Armentia S.J.
Jesús Martín
Javier Angulo
Paulino Lucio
Francisco de Salazar
Ernesto Araco
Carmelo Ibarra
Joan Zulaica O.F.M.
Juan José de Aguirre
José Andrés Aguirre
Ángel de Aramendi
Sustaeta´tar Angel
Tomás Gastelurrutia
Ignacio Franco Capotillo
Juan María Lechosa
Aurelio Castro
F. Antonio Unzueta O.C.D.
Xabier Amuriza
Luis de Alzibar-Arichuenaga
Ormaza´tar Batista Josu Aba K.O.
Julen Calzada
Sebastian Legarza
Arteaga´tar Laurentzi K.O.
Gallastegui Juan Vicente
Josús Mª Echebarría
Berrioategortua´tar Pedro
Miguel Larrauri
Alfonso Azpiazu
José María Atxa
Juan A. Garcia
Juaquin Mª de Guibertegui
Javier Lozano
Jose Manuel Olabarría
Fermín Gongueta
Luis Gaviña



Ramón de Anchía
Angel Mª Santiso
Juan Mª de Arregui
Fco. Javier Ziaurriz
J. Mª Eguiraun
Ander Manterola
Mikel Uriarte
Julian Gaztelu
Jesús Zamalloa
Jesús Arrien
Ramón Larrañaga
Arizmendi Juan José
Barandiaran'tar Emiliano K.O.
Amadeo Rementeria
Jesús Mª Olagüe
José Mª Madariaga
Imanol Ortúzar
Honorio Guerenabarrena
Miguel Saen de Cabezón
Fray Juan Iturregui
Tomás Zugaza-Artaza K.O.
Nikola Tellería
Kepa Iturrarán
Jesús María Palomino
José Ignacio de Llaguno S.J.
Angel Zelayeta
A. Miguel Mª Juarizti K.O.
Alberto Benedicto
Fr. Luis Barayazarra. K.O.
Joaquín Mª de X X
José Sagarna
Artetxe'tar Domeka
Fco. Javier Aguirre
José Antonio Retolaza
Valentín Zabalo

Xavier Ocerinjauregui
Jesús Zalbidea
Benito Anzola
Agustín Azpiri
Lucio Aurrecoechea
Feliz Giménez
Inmanol Oruemázaga
Garitaonaindía'tar Gotzon
Carlos Beunza
Enrique García
Domingo Solabarrieta
José A. Zabala
Javier de Olabe
José Luis Achótegui
Emilio de Cortabitarte

(J. Agirreren artxibotik. Gaztelaniaz ere. Ikus, baita, *Trabajadores*, 1968-Anexo III).





Acosta, Nicanor (A Coruña, 1939)
Amuriza, Xabier (Zornotza, 1941)
Araco, Ernesto (Monasterio de la Rodilla (Burgos), 1934)
Arrate, Kepa (Bilbo, 1938)
Artetxe, Txomin (Gaztelu Eleixabeiti, 1925)
Atxa, Jose Mari (Bilbo, 1933; Bilbo, 2007)
Aurtenetxe, Iñaki (Bilbo, 1932)
Auzmendi, Patxi (Segura, 1939; Loiola, 1984)
Bereziartua, Luis Mari (Izurtza, 1941)
Berrioategortua, Pedro (Apatamonasterio, 1928)
Bilbao, Patxi (Muxika, 1935)
Botey, Francisco (Bartzelona, 1931; Bartzelona, 1996)
Couce, Vicente (A Coruña, 1939)
Dorronsoro, Lukas (Ataun, 1931)
Etxabe, Jon (Altzola, 1933)
Fornes, Eduardo (Bartzelona, 1940)
Gabikagojeaskoa, Alberto (Lekeitio, 1936)
Gamo, Mariano (Tamajón (Guadalajara), 1931)
Garcia, Julian (Murtzia)
Garcia Huelga, Carlos (Asturias)
Garcia Salve, Paco (Farlete, 1930)
Garrido, Jose Mari (Bartzelona, 1940)

Gisasola, Imanol (Eibar, 1938)
Gurrutxaga, Juan Antonio (Sondika, 1936)
Intxausti, Paskual (Munitibar, 1941; Bilbo, 2001)
Izagirre, Felipe (Avila, 1936)
Kalzada, Julen (Busturia, 1935)
Kalzada, J. Antonio (Bilbo, 1939)
Madariaga, Jose Mari (Getxo, 1937)
Muñoz, Pablo (Donostia, 1941)
Naberan, Josu (Gautegiz-Arteaga, 1941)
Ojanguren, Pedro Mari (Bilbo, 1942)
Olabarria, Anastasio (Bilbo, 1916; Bilbo, 2007)
Onaindia, Juan Jose (Andoain, 1839)
Orbe, Martin (Errigoiti, 1934)
Ormaetxe, Martin (Cárdenas (Cuba), 1932)
Ortuzar, Jose Mari (Bilbo, 1942; Bilbo, 2003)
Oruemazaga, Imanol (Berriz, 1931)
Outeiral, Enrique (Galizia)
Perez, Hipolito (Extremadura)
Prat Balaguer, Jose (Mallorca)
Regidor, Francisco (Bilbo, 1935)
Sagastagoitia, Fco. Jabier (Barakaldo, 1938)
Sanchez Sierra, Jesus (Riocorbo (Santander), 1937)
Solabarria, Pedro (Portugalete, 1930)
Telleria, Nikola (Nabarniz, 1916; Sopela, 1975)
Vila, Andreu (Katalunia)
Xirinach, Luis Mª (Bartzelona, 1932; Ripollés, 2007)
Zabala, Jose Antonio (Mendata, 1941)
Zamalloa, Karmelo (Galdakao, 1933)
Zamalloa, Zipriano (Zornotza, 1901; Larrabetzu, 1971)
Zuazabeitia, Mikel (Gasteiz, 1931)
Zulaika, Juan Mari (Zarautz, 1942)





## Nazioarteko kronologia.

**1968**

Marthing Luther Kingen hilketa.

Ikasleen erreboltak Parisen.

Varsobiako Itunaren tropek Txekoslovakia inbaditzen dute.

AEBen eta bere aliatuen kontrako Thet-eko ofentsiba Vietnamgo hegoaldean.

Arma nuklearren ugaltzearen kontrako ituna.

**1969**

Richard Nixon AEBetako presidente.

Frantziako presidente De Gaullek dimisioa aurkezten du.

Ho-Chi-Minh hiltzen da Vietnamen.

Gaddafik boterea eskuratzen du Libian.

**1970**

Mendebaldeko Alemaniak ez erasotzeko ituna sinatzen du SESBekin eta Poloniarekin.

AEBek eta Hego Vietnamek Kanputxea inbaditzen dute.

Allendek Txileko presidentetza eskuratzen du.

Husseinek Jordaniatik PAE kanporatzen du.

**1971**

Bangladesheko errepublikaren aldarrikapena.

Hego Vietnamgo indarrek Laos inbaditzen dute.

Berlini buruzko ituna Ekialdearen eta Mendebaldearen artean.

NBEk Txinako Herri Errepublika onartzen du.

**1972**

Managuako lurrikara.

Mao Tse-Tung-en eta Nixonen arteko elkarrizketa Beijingen.

AEBetako presidente baten lehen bisita SESBeri: arma nuklearrak mugatzeko SALT akordioa.

Watergate kasua AEBetan.

**1973**

AEBetako tropak Vietnametik badoaz.

Brezhnev-ek AEBak bisitatzen ditu.

Estatu kolpea Txilen, Pinochet presidente.

Israelen eta arabiarren arteko laugarren guda (Yom Kippur).

Petrolioaren krisia.

NBEk bi Alemaniak onartzen ditu.

**1974**

Krabelinen Iraultza Portugalen.

Nixonek dimisioa aurkezten du.

Lehen entsegu nuklearrak Indian.

Turkiak Zipre inbaditzen du.

Diktaduraren amaiera Grezian

**1975**

Komunisten garaipena Hego Vietnamen, Laosen eta Kanputxean.

Portugalgo kolonia ohien independentzia.

Indonesiak Timorreko zonalde portugaldarra inbaditzen du.



Guda zibila Libanon.

Guda zibila Angolan.

**1976**

Jimmy Carter AEBetako presidente.

Mao Tse-Tung-en heriotza.

Estatu kolpea Argentinan, Videla jenerala presidente.

Gatazkak Hegoafrikako Soweto auzoan.

Ipar eta Hego Vietnamen batasuna.

**1977**

Argentinan, Buenos Airesko Mayo enparantzan, desagertuen amek elkarretaratzea egiten dute aurrenekoz.

SESBek konstituzio berri bat onartzen dute.

AEBek Vietnamgo gudako desertoreei amnistia ematen diete.

## Euskal Herriko kronologia

**1949-11-2**

Bilbo eta Donostiako elizbarruti berriak.

**1950-5-13**

Casimiro Morcillo eta Jaime Font eta Jose Maria Bueno Monreal, Bilboko, Donostiako eta Gasteizko gotzain.

**1951**

Franco jeneralak Konkordatu berria eskatzen dio Pio XII.ari.

**1953-1954**

Bilboko eta Donostiako seminario berriak.

**1953-3-27**

Vatikanoa eta Espainiako Estatuaren arteko Konkordatua.

**1955-1979**

F. Peralta Ballabriga, Gasteizko gotzaina.

**1956**
Jules Saliège kardinala (Mauriac, 1870; Toulouse. 1956).
**1956-1968**
P. Gurpide, Bilboko gotzain.
**1958-1963**
Juan XXIII.a Aita Santu.
**1960-5-30**
339 apaizek sinaturiko dokumentua.
**1960**
*Enbata* aldizkaria sortzen da Baionan.
**1961**
Herri Gaztedi ekintza katolikoa sortzen da.
**1961-1965**
Vatikano II.a, Juan XXIII.a, Pablo VI.a.
*Mater et Magistra* (1961), *Pacem in Terris* (1963)
**1963-1968**
Lorenzo Bereziartua Donostiako gotzain.
**1963-1978**
Pablo VI.a Aita Santu.
**1964**
Apaiz langileak: Periko Solabarria, Mariano Gamo, Felipe Izagirre, Juan M. Zulaika, Josu Naberan, Julen Kalzada.
**1964-9-2**
Patxi Bilbaoren sermoia.
Jose Ulaziari epaiketa.
**1964-11-1**
Alberto Gabikaren sermoia.
**1965**
Jaime Font Andreu Donostiako gotzaina hiltzen da.
**1966**
Jose Antonio Retolazak *Kili-kili* aldizkaria sortzen du.
**1966-1969**
Fernando Quiroga Palacios, Espainiako gotzainen buru.
**1966-12-14**
Erreferenduma. Sermoiak beroni buruz.



**1967**
Maiatzaren Lehena dela-eta isunak. Salbuespen egoera. Bandasko greba. Manifestazioa. Francori eskutitza 108 elizgizonek. Matesa indultua.
**1967-3-25**
ETAren V. Biltzarra.
**1967-68**
Maiatzaren Lehena: sermoiak.
**1967-1980**
Luigi Dadaglio, Nuntzio apostoliko.
**1968**
14 elizgizon Zamorako kartzelan.
**1968-6-7**
Txabi Etxebarrietaren hilketa. Mezak. Isunak. Jose A. Pardinesen hilketa. Iñaki Sarasketaren ihesa eta atxiloketa.
**1968-7-21**
Zamorako Konkordatu Kartzelaren hasiera: A. Gabika.
**1968-8-2**
Meliton Manzanasen hilketa.
**1968-10-27**
Mateo Mugika gotzaina hiltzen da Zarautzen.
**1968-11-4**
Derioko seminarioaren okupazioa. Okupaziokoen izenean Vatikanora.
**1968-11-18**
Pablo Gurpide gotzainaren heriotza.
**1968-11-19**
Jose Maria Cirarda izendatzen dute Bilborako Administrari Apostoliko.
**1968-11-28**
Derioko seminarioaren okupazioa bukatzen da.
**1968-1971**
Arturo Tabera Araoz, Iruñeko gotzain.
**1968-1979**
Jacinto Argaia, Donostiako gotzain.

**1969**
26 elizgizon Zamorako kartzelan.
**1969**
Grebak. Salbuespen egoera. Erbesteratzeak. Henri Charrièreren *Papillon* argitaratzen da. *Anaitasuna* aldizkaria Gogor taldearen ingurukoek Galdakaon.
**1969-1971**
Casimiro Morcillo, Espainiako gotzainen buru.
**1969-4-6**
Mogrovejoko sarekada, Jon Etxabe tarteko.
**1969-4-9**
Artekaleko sarekada: Mikel Etxeberriaren ihesa apaizen bidez Fermin Monasterio taxistaren hilketa.
**1969-4-11**
Mogrovejoko sarekada, Jon Etxabe tarteko.
**1969-5-30**
Bost apaizen gose-greba eta salaketa agiria.
**1969-6-20**
Gose-grebakoen aurkako sententzia.
**1970**
19 elizgizon Zamorako kartzelan.
**1970-12-3**
Burgosko epaiketa. Julen Kalzada eta Jon Etxabe tarteko.
**1970-1971**
Zamorako tunelgintza.
**1971-11**
Zamorako tunelgileak harrapatu.
**1971-1981**
Vicente Enrique Tarancon, Espainiako gotzainen buru.
**1972**
Lau elizgizon Zamorako kartzelan.
**1972-78**
Antonio Añoveros, Bilboko gotzain.
**1972-1979**
Jose Maria Setien, Donostiako gotzain laguntzaile.



**1973**
Elizgizon bat sartu zuten Zamorako kartzelan.
**1973-6-8**
Luis Carrero Blanco Gobernuko presidente.
**1973-12-20**
Luis Carrero Blancoren hilketa.
**1973-11**
Zamorako mutina. Gose-grebak eta mobilizazioak Estatuan.
**1973-12-21**
*1001 prozesua*, Paco Garcia Salve tarteko.
**1974-2-24**
*Antonio Añoveros auzia.*
**1974-7-19**
Franco ospitalera.
**1975-9-27**
ETAkide bi eta FRAPeko hiru kide fusilatu.
**1975-11-20**
Francoren heriotza.
**1976-03-24**
Zamorako kartzelaren bukaera.

# HITZ-ATZEA

Felix Placer

LIBURU HONETAN ZEHAZTASUN HISTORIKOZ JASOTZEN diren gertaerek, frankismoaren garaiko urteetan, abade euskaldun talde batek, azken ondorioetaraino iristeko erabakiz, Herriaren defentsan hartutako konpromisoa erakusten dute. Gaur egun haien lekukotzak jasotzea memoria berriztatzeko eta justizia egiteko behar-beharrezko ekimena dela deritzot.

Euskal Herriaren kontra areagotutako errepresio urte haien joanaren testuinguruan kokatutako kontaketak, idazkiak, dokumentuak, ez dira apaiz haien eta eliz hierarkiaren eta gobernu diktatorialaren artean bizi izandako tentsio larriagotuaren eta borrokaren oroimen soila. Lekukotza zirraragarri hauek, nire ustez, badute esanahia, kontakizun liluragarri honen epilogo modura komentatu nahi nukeena, hain zuzen, protagonista izan zirenek horretarako egin didaten gonbidapena eskertuz. Mendekotasun politiko eta eliztarrak sorrarazitako egoera jasanezinarekiko hausturarik erabatekoena adierazten dute. Eliza berri baten izaera irudikatzen dute, Derioko seminarioan itxialdia egin zutenen esanetan pobrea, librea, dinamikoa eta lekuan lekukoa izan behar duena, hots, injustiziaren aurrean etsi onekoa barik, askapeneko borrokan Herriarekin bat egiten duena, Ebanjelioaren iragarpenaren osagai moduan.

## Errepresio hamarkadan

Zamorako jazoerak –bai kartzela barrukoak eta bai kartzelaren ingurukoak– euskaldunen kontrako errepresioaren nondik norako ikaragarria islatzen zuten izozmendiaren ertza besterik ez ziren. Elizaren eta Estatuaren arteko ados jartzearen eta Euskal Herriaren kontrako zapalketa nazional eta sozialaren aurrean izandako isiltasunaren kontra zuzen-zuzen lerrokatutako eliz sektore batek hartutako jarreraren adierazpiderik dramatikoena, larriena eta irmoena bilakatu ziren.

Baina Zamorako kartzelaren kontua ezin da ulertu egoeraren kontzientzia argia izan gabe, bai urte haietan eta bai diktadura frankista guztian zehar, euskaldun zen ororen zapalkuntza deuseztatzailea, eta –Mateo Mugika eta Vidal y Barraquerren salbuespenekin soilik– «*cruzada*» bedeinkatu zuen Eliz hierarkiaren konplizitatea eta inposatutako erregimenarekiko «fideltasunari» ofizialki eusten zion jokaera kontuan izan gabe. Diktadura frankistari aurpegi emanez justizia eskatzeko egindako edozein saio era guztietako amorruz eta edozein modutako bitartekoz, tortura barne, pertsegitua izan ohi zen.

Giro txar, itogarri horretan, Elizaren gehiengoa isilik zegoenean, Konkordatuaren akordioz, zin lotsagarria tarteko, izendatutako hierarkia meneko eta amore emailearen aurrean, zerbait jazo behar.

Halaz ere, Eliza hartan, ez zen guztia bidegabea. «Pio XII.a aita santuari zuzendutako Memoria» (1944), edo «339 apaizen Idazkia» (1960), ezezagunagoak diren beste batzuen artean, euskal egoeraren eta Elizaren salaketa ausartak izan ziren, herritarren eskubideekiko begirunea eta Euskal Herrian txertatuagoa eta pobre eta zapalduen aldekoagoa behar zuen pastoraltza eskatzen ziren. Euskal apaizteriaren zenbait talde erlatiboki minoritarioen jarrera horiek –errepresaliatuak eta zigortuak– Hegoaldeko lau elizbarrutietan eta Iparraldean egikaritu ziren. Juan XXIII.ak justizia soziala bultzatu zuen,



*Mater et Magistra* entziklikaren bidez, eta Herrien bakea, berauen eskubideak errespetatuz, *Pacem in terris* entziklikan. Bukatu berria zen Vatikanoko II. Kontzilioa (1962-65). Kontzientzia sozial eta politiko berria ernetzen hasia zen Elizaren zenbait taldetan, polizien zaintza eta errepresioa gorabehera. Elizbarrutiak Kontzilioaren ezarpenaren ibilbide neketsuaren hastapenetan ari ziren; Espainiako Estatuko hierarkiaren gehiengoak ezer gutxi ala ezer ikasi ez zuen eta are gutxiago koherentziaz praktikan ezartzeko gogorik zuen Kontzilioaren erabakiak, hain zuzen.

Frankismo berantiarraren garaiko hastapenak ziren. Bere nagusitasun absolutuaren jarraipena arriskuan ikusten duen edozein erregimen diktatorialarenak bezalaxe, azken urteak –Euskal Herrian, batez ere– bereziki zapaltzaileak bilakatuko ziren. Burgosko Prozesua Gobernuaren boterearen erakustaldi gertatzea nahi izan zuen, baina nazioarteko elkartasunak heriotza zigorrak eragotzi eta inflexio-puntua abiarazi zuen.

Jasanezina zen errepresio nazional eta sozialaren aurkako hurrenez hurreneko zenbait erantzun bideratu ziren, hamarkada honetan, euskal elizbarrutietan. Taldeak, mugimenduak, borrokak, era guztietako ekintzak indartsu sortu ziren: ETA erakunde armatutik hasi eta hezkuntza, kultura zein prozesu sozialetara artekoak. Elizaren esparruan sortutakoek ere, hala nola JOC, HOAC eta beste zenbaitek eta, batez ere, Herri Gaztedik, berebiziko eragina izan zuten gazteek errepresioaren aurrean barneratu zuten kristau kontzientziaren bilakaerarako.

Ekimen errebindikatibo horien guztien giroan sortu zen Gogor taldeak eta Zamorako Konkordatu Kartzela zela medio kateatu ziren gertaerek aparteko garrantzia izan zuten beren irmotasun eta koherentzia eliztar eta sozialagatik. Horrela, bada, esanguratsua da zenbait historialari eta azterlarik nola gutxiesten dituzten ekintza errebindikatibo horiek guztiak, estremistatzat hartuz ala isilduz.

## Herriaren zerbitzurako Eliza

Zamorako kartzelak agerian ipini zituen frankismo berantiarreko Elizaren azkenengo eta erabateko kontraesana, ideologia nazional-katolikoaren iraupena eta botere diktatorialaren zerbitzura jarritako eliz mendekotasuna. Beste talde batzuk ere mobilizatu ziren hala Bizkaian nola Gipuzkoan; astiroago Nafarroan eta, halaber, Araban eta Estatuko beste esparru batzuetan (izan ere, beste leku batzuetako apaizak ere izan ziren Zamorako kartzelan). Bestalde, Espainiako hierarkiako sektore minoritarioak baina esanguratsuak ere hasi ziren Kontzilioak onartutako jokabideen erabat kontrakoak ziren egoera eskandalagarri haien aurrean erantzuten.

Egiaztatu ahal zen talde horietan kalitatezko biraketa eta funtsezko aldaketa gertatu zela Euskal Herriaren egoerari buruz, Elizaren barnean nabaritzen ziren jarrera erlijioso ezberdinetan islatzen zirenak. Ordura arte Eliza defendatzea izanik kontua, aurrerantzerako argi zegoen garrantzitsua ez zela erlijioa babestea eta are gutxiago eliz instituzioa. Konpromisoaren ardatza Herria askatzea zen eta beraren eskubideak justiziaren bideetatik eta analisi eta praxi berri horien ikuspuntutik irakurri eta ulertutako Ebanjelioaren iragarpenaren bideetatik defendatzea. Elizaren zerbitzurako Herria ulertzetik, Herriaren zerbitzurako Eliza izatera egin zen aldaketa. Honenbestez, Elizaren eredua, eginkizuna eta izateko arrazoia bera aldatu egiten ziren; hau guztia bat zetorren Ebanjelioaren esanahiarekin eta Eliza ez zegoela zerbitzatua izateko zerbitzatzeko baino ozenki aldarrikatu zuen Kontzilioaren irakaspenarekin.

Pentsaera aldaketa horrek edo, zehatzago esanda, fideltasun aldaketa horrek, hierarkia –nola ez– kezkatzeko moduko garrantzi eta adierazpide profetikoa bereganatu zituen Deriotik Zamorarako tartean. Izan ere, kristandadearen Elizaren egiturari eusten zioten oinarriei azpijana egiten zitzaien eta tunel hura sinestedunei askatasun eta konpromiso eremua ikusarazteko ahalegina zen, mundura eta herrira jalgiz, Ebanjelioa bere sakontasunean biziz herri horren bizitza, sufrimenduak, egoerak, borrokak konpartitzea.



Baina batzuetan Vatikanoaren diplomazia konplize zela, eta beste batzuetan hartutako jokabideak adierazpide estremista eta ideologizatuak zirela argudiatuz, elizbarrutiko hierarkiaren deskalifikazioak eta kondenak tarteko, ez zen entzun apaiz haien deiadarra, Aita Santuarenganaino helarazten alferrik saiatu ziren arren. Apaiz batzuei pastoral ministeritza debekatzeraino iritsi ziren; beste batzuek, aldiz, pastoral ministeritzarekiko fideltasunagatik pairatu beharreko jazarpena salatzea saihestu zuten edo uko egin zioten torturen froga nabariak ikusteari. Eta begi-bistakoak ziren kontraesanak gorabehera, iraunarazi egiten zioten kartzela doilor eta iraingarri hari eta, gutxienez, beste presoak bezala tratatuak izan zitezen apaiz presoek egindako eskaerei ez zitzaien jaramonik egiten. Ihes egiteko saioa, gose-greba, kartzelako zenbait trasteri su emanez egindako matxinadaren gisako muturreko ekintzak, jasanezina gertatu zen egoera eta izen gabeko injustizia salatzeko azken oihu eta baliabideak baino ez ziren izan.

## Pastoralgintza eta teologia askatzaileak

Gogor taldea, euskal herri langilearekin, Euskal Herriaren kultura, hizkuntza eta identitatearekin elkartasunez egindako ekimen pastoralen eskarmentuz sortu eta gauzatu zen. Urte gutxi batzuk lehenago, «339 apaizen Idazkia» iritzi publikoaren aurrean ezeztatzen saiatu ziren. Baina haien salaketa isildu ez, eta ahots berriak plazaratu ziren indartsu, hierarkiaren isiltasunaren eta zapalketa sozial eta nazionalaren aurrean. Justiziaren aldeko borrokan, beste batzuekin batera, engaiatuta, Espainiako Eliza manipulatuaren eta Espainiako Estatuak Herriaren kontra zeraman errepresio orokorraren aurka muturreko salaketa ekintzetara behartzen zituen barne

indar moduan ulertzen zuten beren apaizgoa, Zamoran espetxeratutako apaizek komunikatu batean jakinarazi zutenez.

Askorentzat Gogor taldearen esperientzia eta ekintzak pastoral zuhurtziagabekeria izan ziren. Baina ba al zegoen, ingurumari hartan, protestazko erantzun irmo haiek ez beste modurik zapalketaren aurrean elkartasunezko ahotsa entzunarazteko? Nora zeraman eta zer zekarren hierarkiaren isiltasun *zuhurrak*? Apaiz talde hark jokabide irmo eta kementsuaren, ez indarkeriazkoaren, aldeko aukera egin zuen. Non zegoen Ebanjelioaren aldarrikapenarekiko fideltasun gehiago, hain zuzen ere, 1971ko gotzainen sinodoak adierazitakoa kontuan hartuz, hots, «justiziaren aldeko jarduna Ebanjelioaren aldarrikapenaren eta Elizaren misioaren funtsezko osagai direla, gizateria zapalketa egoera orotatik askatzeko eginkizunean»?

Nire ustez, ekintza pastoral haiek teologia bizi, askatzaile, politikoaren adierazle ziren, gogoeta eta idazki bidez azaldutakoak izan ere; baita ere poesia moldez eta Derioko itxialdian ahots gazte eta ozenak abestutako otoitz zirraragarrien bidez. Herriaren belarrietan indar profetikoz burrunba egiten zuten, eta haien oihartzuna gure egunetaraino heldu da. Gogor taldeak, ene irudiko, egiazko teologia narratiboari hasiera eman zion, errealitatearen eta «Euskal Herri Langilearen» azterketa zintzo batetik abiatuz, eta Ebanjelioaren barrutik gogoeta askatzailearen jardunbide metodologikoa garatu zuen, Jainkoarenganako uste on eta itxaropenak eragindakoa. Eklesiologia hezurmamitua garatzeko bide koherenteak proposatu zituen, kristologia askatzailea oinarritzat hartuta. Egia esateko, teologia subertsiboa, eraldatzailea, iraultzailea proposatu zuen. Baina posible al da zintzo eta leial izan daitekeen beste teologiarik, herriek zapalketaren esperientzia latza bizi dutenean eta beren barne-barneko askatasun irrikak zapalduta ikusten dituztenean?



## Memoria eta esperantza

Zamora ez zen izan oroitzapenaren esparrurako gelditzen den denboraldi bat. Garai horretan bizi izandako gertaerak, gure historia biziaren parte direnak, askapen prozesuaren borrokaldi luzea dira, errepresio ororen, bai banakoaren eta bai kolektiboaren, aurrean izandako erresistentziaren parte. Hura gogoratzeak Elizaren barnean ezkutatu –manipulatu eta desitxuratu egin ez denean, gaitz erdi– nahi izan den kontzientzia agerrarazten du; gure historiaren beste gertaera batzuk ezkutatu nahi izan diren bezalatsu, nahiz eta horietako batzuk, berandu izanik ere, errekuperatu eta erreparatu egin diren. Baina ez dira artxibo historikorako memoria. Bizirik diraute, liburu honetan oroitarazten diren gertaera haiek eragin zituzten arrazoietariko asko orduan bezalaxe gaur ere iraun egiten duen gatazkaren sorburu direlako eta Zamora askoren euskarri.

Oroitzapen hunkigarriz beteriko orrialde hauek, borroka samingarri eta gogor baten isla, apaiz eta sinestedun izateko modua Herri zapaldua zerbitzatzea zela ulertu zutenen gogoeta sakon eta konpromisoaren lekukotza dira. Bizipen ahantzezin larri haien kontaera zehatzak adore heroikoz eutsitako borroka kementsuaren adierazpide dira, beren Herriaren oinazea, gizon-emakume langileen aurkako errepresioa, Ama Lurraren seme-alaba direnen nortasun maiteenaren ezabaketa beren izaeraren sakonenean sentitzen zuten apaiz gazteen barne muinetan eta bihotzean sortutako konbentzimenduaren frutua. Euskal Herriarengan eta Ebanjelio askatzailean zuten sinesmenetik sortua izan ere. Ezin hautsizko konfiantzan finkaturik, Herriari eta Herriaren hizkuntzari, kulturari eta askatasunari zieten maitasun suharrak eragindakoak.

Jainkoaren Herri den Elizaren partaide sentituz, Elizaren gidari gehienek, kide umiliatuenak eta zapalduenak defendatu beharrean, eliz botereaz baliatuz kontzientziak menperatzeko kolaboratzaile lausengari besterik ez zirenean, benetako

sen profetikoz, erradikaltasunez, «parresiaz» eta indarrez –gogortasuna– erreakzionatu zuten, Euskal Herria suntsitu nahi zuen indarkeria azpiratzailearen aurka. Baliozko eta koherentetzat jo zuten erantzun bakarra zen, erregimen diktatorialaren injustizia nabarmena, Espainiako Eliza hierarkikoaren konplizitate historikoz, urteetan pairatzen ari zen Herriaren zerbitzari izateko.

Eliza isil eta isildu batean oihu garratza izan zen Zamora, askatasun irrintzia Herriaren oinazearen erdian. Kartzela hura hertsi egin zen. Gogor taldea, talde eratu gisa, desegin egin zen. Baina ez haren salaketa, haren jardunbidea, haren errebindikazioak, Euskal Herriaren aldeko eta justiziaren eta askatasunaren aldeko borroka. Izan ere, *trantsizio politikoa* eta *demokrazia konstituzionala* deitutakoek ez diete erantzun oraindik gauzatu gabe jarraitzen duten Herri honen oinarrizko eskakizunei eta eskubideei. Euskal Herri libre, burujabe eta demokratikoki bere etorkizunaren jabe izango denaren alde ari diren borrokalari askoz beterik dira kartzela berriak. Eta gaurko Elizaren gidaritza, berriz, Herri honen eskubideak aitortu eta horien baieztapen eta defentsaren aldekotzat jo daitekeen edozein «desbideratze alderdikoiren» baten alde ez lerrokatzeko, inoiz euskal gotzainek beren gutun pastoraletan egin izan dutenez, eliz organigrama araztua eta immunea eratzen saiatzen da.

Horregatik guztiagatik, bada, uste dut askok eskertzen diegula gure oraintsuko historiaren lekuko hauei, memoria bizi honetan kontatutako borroka, beraiek bezala askatasunaren alde borrokatzen jarraitzen duten Euskal Herriko hainbat eta hainbat seme-alabentzat bultzagarri izango den kontaketa hunkigarria. Eskerrik asko!





## 1. Zamorako kartzela eta garaiko inguru-giroa:

### 1.1. Liburuak

ABAD, José Miguel: *El Obispo Añoveros.* Una vida apasionante. Cádiz, 2008, 2. ed.

AIZPURUA, Itziar: *Jokin Gorostidi Autobiongrafia.* Tafalla, 2006.

ALDAY, Jesús María: *La voz del clero vasco en defensa de su pueblo.* Bilbao, 1986.

AMOVER, Francesc: *Il Carcere Vaticano. Chiesa e fascismo in Spagna.* Introduzione di Ernesto Balducci. Milano, 1975.

AMURIZA, Xabier: «Nikola. Gizon bat hil da» in *Laureun herri. Mila bertso berri.* Donostia, 1982.

AMURIZA, Xabier: *Hil ala bizi.* Donostia, 1985.

AMURIZA, Xabier, NABERAN, Josu: «Julen Kalzada Herri Gazteditik Zamorara» in *Euskadi eta Askatasuna III.* Tafalla, 1993, 180 eta j.

AMURIZA Xabier, NABERAN, Josu: «Periko Solabarria: Trianoko minetatik Zamorara» in *Euskadi eta Askatasuna. IV.* Tafalla, 1993, 145 eta j.

AMURIZA, Xabier: «Espetxe inebitablea» in *Enaz banaz.* Bilbao, 1999.

ANDER DEUNA IKASTOLA: *Ander Deuna Ikastola, 25 urte (1968-1996).* Sopela, 1996.

AÑOVEROS, Antonio: «El cristianismo, mensaje de salvación para los pueblos» in OBISPADO BILBAO. GOTZAINTEGIA, Bilbao, 1998.

ARESTI, Gabriel: «Larrabetzun» in *Azken Harria, Poemak II.* Donostia, 1975, 450 eta j.

BARROSO, Anabella: *Sacerdotes bajo la atenta mirada del Régimen Franquista (Los conflictos sociopolíticos de la Iglesia del País Vasco desde 1960 a 1975).* Bilbao, 1995.

BARROSO, Anabella: *Iglesia vasca. Una Iglesia de vencedores y vencidos. La represión del clero vasco durante el franquismo.* Madrid, 2001.

BARROSO, Anabella: «1950-1974. Algunas claves para conocer la historia del Seminario de Derio» in *¿Qué pasó con el seminario de Derio?».* Bilbao, 2004, 28-53. o.

BILBAO, Patxi: *Gomuta Biziak (Memorias / Vivencias).* Ea, 2002 (Daktilografiatua).

CIRARDA, José Mª: «Jornadas sobre nacionalismo vasco. La Iglesia y el nacionalismo vasco», Universidad Autónoma de Madrid-en 1996-11-15ean emaniko hitzaldia (Daktilografiatua).

CIRARDA, José María: *Recuerdos y memorias.* Madrid, 2011.

ESNAOLA, Serafín / ITURRARÁN, Emiliano: *El clero vasco en la clandestinidad (1940-1968).* Lizarra, 1994.

ETXANIZ, José Ángel: «Años de batalla campal (1967-1968)» in *La Iglesia y el franquismo. Homenaje a aita Onaindia.* Gernika, 2003, 90 eta j.

ETXEBARRIA, J. L.: *La incidencia del movimiento eclesial Herri Gaztedi en el mundo rural vasco en la década de los 60.* Gasteizko Teologi Falkultatean 1993an aurkezturiko tesia (Daktilografikoa).

FERNÁNDEZ HOYOS, Francisco: *La cárcel concordataria de Zamora. Una prisión para curas en la España franquista* in www.cefid.uab.es.

GAMO, Mariano: *Huellas digitales. Libro de horas* (Prólogo de Víctor Manuel Arbeloa). Madrid, 2001.

GAMO, Mariano, SOLABARRIA, Periko, *et alii: Curas obreros.* Barcelona, 2009.

GARCÍA SALVE, Francisco: *Ejercicios de yoga para todos.* Bilbao, 1966.

GOGORTASUNA: «Al Gobernador y Obispo de Bilbao», 1967-III-12an, in TRABAJADORES, 1968-305.

GOGORTASUNA: *Gogor.* Imp. Du Labourd. 1968.

GOGORTASUNA: «Paulo VI.a aitasantuari» in *Euskadi eta Askatasuna,* II, 263-265.

GOGORTASUNA: «Zamoratik euskal Gotzainei (1973.7)» in *Euskadi eta askatasuna,* III, 297-8.



GRANJA, José Luis de la, PABLO, Santiago de: «El franquismo: de la *Cruzada* a la contestación» in *Historia del País Vasco y Navarra en el Siglo XX.* Madrid, 2009.

GUTIÉRREZ, Fernando: «Lluis Maria Xirinacs, el sacerdote español más universalmente famoso» eta «Jon Etxabe Garitacelaya, el único cura armado de España» in *Curas represaliados en el franquismo.* Madrid, 1977.

HERMET, Guy: *Los Católicos en la España Franquista II. Crónica de una dictadura.* Madrid, 1986.

IZTUETA, Paulo: *Sociología del fenómeno contestatario del clero vasco: 1940-1975 (Análisis de las causas de la radicalización del clero vasco en el período 1940-1975).* Donostia, 1981.

IZTUETA, Paulo: *Erbesteko euskal pentsamendua.* Donostia, 2001.

LARZABAL, Piarres: «Euskaldun apez presoen amak doatzi Batikanorat» in *Anai artean.* Tafalla, 1996, 23-25.

LEZAUN, Jesús: *La Iglesia en Euskal Herria.* Hernani, 1996.

LOPEZ, A., Emilio et alii: *Rikardo Arregi / Gizona eta garaia.* Andoain, 1996.

MARÓN, Carmelo: *Evangelio, Iglesia y Pueblo Vasco. Análisis teológico de las actividades y comportamientos político-sociales de la Iglesia en Vizcaya (1968-1978).* Deustuko Unibertsitatea, 1980 (Daktilografikoa).

MORÁN, Gregorio: *Los españoles que dejaron de serlo.* Barcelona, 2003.

MUNÁRRIZ, Tasio: «Sobre los sacerdotes presos en la cárcel de Zamora» in *Santa María de Portugalete / Parroquia revolucionaria / 1961-1982.* Bilbao, 2008.

OLAZAR, Martin: *Zu, Martin!* Bilbao, 1999.

ONAINDÍA, Mario: *El precio de la Libertad / Memorias (1948-1977).* Madrid, 2001.

ONAINDÍA, Mario: *El aventurero cuerdo.* Madrid, 2004.

PLACER, Felix *et alii: Herria-eliza / Euskadi / pueblo-iglesia.* Donostia, 1978.

PLACER, Felix: «La Iglesia vasca en el periodo 1960-1970» in *Creer en Euskal Herria.* Bilbao, 1998.

PLACER, Felix: *La religión en Euskal Herria.* Tafalla, 2010.

SASTRE, Alfonso, DORRONSORO, Lukax: *Análisis de un comando / Komando baten analisia.* Hondarribia, 1993.

TARANCÓN, Vicente Enrique: «Motín en la cárcel concordataria de Zamora» in *Confesiones.* Madrid, 1996.

TRABAJADORES DE LAMINACIÓN DE BANDAS: *Nuestra Huelga*. Paris, 1968.
UGARANA LARRUN, Andoni: *La lucha del Pueblo Vasco (los siete de Zamora)*. Baiona, 1973.
UGARTEBURU, Angel: *Nork lekuskez*. Elgoibar, 2010 (Daktilografikoa).
URIARTE, Teo: *Mirando atrás / Del proceso de Burgos a la amenaza permanente*. Barcelona, 2005.
UNZUETA, Ángel Mª: *Vaticano II e Iglesia local*. Bilbao, 1994.
VILLA, Imanol: «El pecado de los curas» in *Historia del País Vasco durante el franquismo*. Madrid, 2009.
VILLOTA ELEJALDE, Ignacio: *La Iglesia en la sociedad española y vasca contemporáneas*. Bilbao, 1985.
VILLOTA ELEJALDE, Ignacio: *La Iglesia y sociedad España-País Vasco*. Bilbao, 2000.
WOODS, Margaret: *Clerical Opposition to the Franco Regime in the Diocesis of Barcelona, Vitoria and Bilbao after the Civil War (1939-1975)*. Dublin, 2001.
ZALAKAIN, Jexuxmari: *Balentxi / Hamalaugarren apostolua*. Tafalla, 2007.
ZALBA, Marcellino: Theologiae Moralis Summa II. Matriti, MCMLIII.
ZULAIKA, Joseba: «Herri Gaztedi» in *Violencia vasca. Metáfora y sacramento*. Madrid, 1990, 74 eta j.

## 1.2. Aldizkari eta egunerokoak

*ANAITASUNA*: «Oskorri Gaitz» teatro kantatua Larrabetzuan» in Anaitasuna, 1972-1-15, 7an.
APAOLAZA, Urko: «Abadetza tresna bat zen guretzat, inpunitatea» in www.argia.com/multimedia.
ARANBURU, Xabier: «Periko Solabarria sindikalistari elkarrizketa» in *Argia*, 1996-5-12.
ARESTI, Gabriel: «Mundu berri eta bizkor euskaldunaren espillu» in *Anaitasuna*, 1971-8-30, 1 eta 6.
*BODB*: «En torno a la cárcel de Zamora», 1974-1, 63-66.etan.
CANDÓN CALATAYUD, Guillermo: «Nota del Gobierno Civil de Vizcaya» Bilbao, 1968.
*EL PAÍS*: «El dirigente de HB Pedro Solabarría, juzgado por apología del terrorismo» in *El País*, 1984-3-15.



*ENBATA*: «Un sermon que l'on doit connaître» in *Enbata*, 1965, 3, 45.a.
ETXANIZ, Nemesio: «Gabikagojeaskoa'tar Alberto, apaiz eta euskalmartiri» in *Herria*, 1974, 1248. zk., eta www.armiarma.com.
ETXEBERRIA, Idoia: «Lukax Dorronsoro - Antzerki Zuzendaria» in *Berria*, 2007-5-9.
EUZKO DEIA: «Un religieux basque donne une leçon à l'episcopat espagnol». in *Euzko Deia*. 1961 (IX-X), 1.
*EUZKO DEIA*: «Sermon contre les tortures» in *Euzko Deia*. 1961 (IX-X),
ARGAYA, Jacinto, CIRARDA, José María: «Gure eleizbarrutiak gaur: nekeak eta itxaropideak» in *BOOB*, 1969-10-26.
*ARGIA*: «Jon Etxaberen arrakastaz» in *Argia*, 1977-2-20.
ARREGI, Juan Mari: «Vaticano, Unidad Española y Euskal Herria» in *Egin*, 1995-9-24.
ARREGI, Juan Mari: «Un médico socialista que arriesgó desinteresadamente», in *Gara*, 2007-1-5.
ARREGI, Juan Mari: «El Vaticano, Arrupe y el Proceso de Burgos» in *Gara*, 2007-11-15.
ARREGI, Juan Mari: «Cuatro-Cuatro-Mil» in *Gara*, 2008-11-4.
ARREGI, Juan Mari: «Díez Alegría, otro amigo de los vascos» in *Gara*, 2010-7-1.
HERMOSILLA, Gotzon: «Julen Kalzada AEKko kide historikoa» in *Busturialdeko Hitza*, 2009-12-10.
*HERRIA 2000 ELIZA*: «Hamar urte eta gero / Operación cuatro-cuatro-mil» in *Herria 2000 Eliza*, 1978-10.
IRIGOIEN, A.: «Lizardi Saria» in *Euskera*, 1961-VI.
IRIGOIEN, A.: «Orixe Saria» in *Euskera*, 1962-VII.
IRUJO, Pedro María de: «Los curas y otras quemas / Curas vándalos» in *Tierra Vasca*. Buenos Aires, 1973.XII.
MOLLARRI, Joxe: «Julen Kalzada: Administrazioaren jokabideak desastrera garamatza» in *Argia*, 1985-2-24.
MURUA, Imanol: «Ander Manterolari elkarrizketa» in *Jakin* 174, 9-10, (31-100).
OBISPADO. BILBAO. GOTZAINTEGIA: *Antonio Añoveros. Agur, Jauna*. Bilbao, 1988.
ORBE, Martin *et alii*: «Eliza Katolikoa Euskal Herrian Kontzilioaren ondoren» in *UEU-Jakin*, 1996, 95a.
ORUEMAZAGA, Imanol: «Francoren heriotzaren urteurrenean» in *Ispaster - Hitza*, 2005-11-20.

PALENZUELA, Antonio: «Los sacerdotes de Zamora están sometidos a un régimen penitenciario de especial dureza» in *El Norte de Castilla*, 1973-11-16.
PETXARROMAN, Iñaki: «Periko Solabarria: Langileei elkartasunerako gaitasuna lapurtu diete» in *Berria*, 2004-9-19.
PLACER, Felix: «Elizaren azken aldiotako historia Euskal Herrian (1975-1995)» in *Jakin*, 1996, uztaila-abuztua.
PLACER, Felix: «Un documento histórico y actual» in *Gara*, 2010-5-28.
PLACER, Felix: «El escrito de los 339 sacerdotes vascos: 50 años» in *Euskonews*, 542.a.
*QUICK*: «Blutiger Terror in Spanien». 1970-10-18.
UNZUETA, Patxo: «Iglesia vasca» in *El País*, 1984-4-2.
URIZAR, J. A.: «Alfabetatzea zertan den (Alberto Gabikarekin berbetan)» in *UEU-Ele 3*, 1987.
ZELAIETA, Angel: «Jose Angel Ubieta: Bibliaren ikasketa eta ikerketak gehiago dira zientziaren baitakoak» in *Euskaldunon Egunkaria*, 2001-1-28.
ZELAIETA, Angel: «Periko Solabarria, abade beharginen mogimentukoa» in *Euskaldunon Egunkaria*, 2001-8-20.

### 1.3. Artxiboak

GOGORTASUNA: «Francisco Franco Bahamonde jaunari ta Españako gaurko Gobernuari eskutitz agiria», 1967-6-25 (Jabi Agirreren artxiboan).
GOGORTASUNA: «Gure Obispoaren eriotza dala-ta». Derio, 1968-11-18 (Carmelo Maronen artxiboan).
GOGORTASUNA: «60 abadeak seminariotik urten egiten dira». Derio, 1968-11-28 (J. Agirreren artxiboan).
GOGORTASUNA: «Sacerdotes vascos en huelga de hambre», 1969 (Bizkaiko gobernu zibilean gordea).
GOGORTASUNA: «Zergatik erbesteratutako abade batek ez dauan artu Añoveros jauna». Donibanen 1972-7-1-ean (Jabi Agirreren artxiboan).
GOGORTASUNA: «Carta abierta dirigida a Mons. Cirarda, Obispo A. A. de Bilbao». «Francia, a 2 de Octubre de 1972» (Jabi Agirreren artxiboan).



GURPIDE, Pablo: «Excmo. Sr. Gobernador Civil de Vizcaya» in «Gobierno Civil. Obispado. 10.julio.1965» delakoan gordea.
IGLESIA DE VIZCAYA: «Felipe Izagirre» in *Hoja informativa*. 1972-6 (Jabi Agirreren artxiboan).
MADARIAGA, Jose Mari *et alii*: «Borondate oneko andra ta gizon gure anai-arrebai, agintariei ta erritarrei». Mungiako artzipreztaldeko P. Bilbao, J. L. Jauregi, J. M. Madariaga, M. Markaida, M. Olazar, J. Ozerinjauregi, B. Zabalo eta J. Zalbidea. 1967 (Jabi Agirreren artxiboan. Gaztelaniaz ere).

## 2. Zamorako kartzelan eginak

### 2.1. Liburuak

AMURIZA, Xabier: *Menditik mundura*. Bilbao, Ed. Printzen, 1977.
AMURIZA, Xabier: *Hiztegi errimatua*. Bilbao, 1981.
ETXABE, Jon: «Kartzelako liburutegia» (Daktilografikoa).
KALZADA, Julen: *Herriak eta gizonak*. UEU, 1979.
SASTRE, Alfonso: *Guillermo Tell tiene los ojos tristes-Guillermo Tellek triste ditu begiak*. 1984 (Zamorako presondegian itzulia).

### 2.2. Aldizkari eta egunerokoak

AEK: «Atzizkiak» in *Urraspide 6*, 1980-7 (Zamorako presondegian egina).
AMURIZA, Xabier: «Euskal aurrizkiak» in *Euskera*, 1974.

## 3. Artxiboak

GOGORTASUNA: «Zamorako espetxean, Jose Mari Gotzain Jaunari». 1969-7-6an (Jabi Agirreren artxiboan).

AURKIBIDEA

## BILDUMA HONETAKO BESTE IZENBURU BATZUK

*Felix Likiniano. Ezina ekinez egina.*
Pilar Iparragirre.
*Joxemiren uzta. Euskal prentsa herri proiektua da.*
Jexuxmari Zalakain.
*Internet solidario@. Azken Iraultza.*
Irantzu Larrañaga.
*Autonomoekin solasean.*
Jexux Arrizabalaga eta Anjel Murias.
*Marxez haratago.*
Joseba Tobar-Arbulu.
*Egunak.*
Iñaki de Juana Chaos.
*Anai artean.*
Piarres Larzabal.
*Nere mendixkatik. Apez bat ETAko gudariez mintzo.*
Piarres Larzabal.
*Nafarroa: iragana eta geroa.*
Iñaki Petxarroman.
*Magrittek ez omen zuen pipatzen.*
Fito Rodriguez.
*Desobedientziaz ibiltzen.*
Ekai Txapartegi.
*Ikasi eta Irauli. Euskal ikasle mugimenduaren historia.*
Mikel Zabala, Sabino Ormazabal, Igor Arroyo.
*Jeu de Paume.*
Fito Rodriguez.
*Gerezi gorrien garaia.*
Paul Asensio, Mikel Ayllon
*Kasandra leihoan.*
Fito Rodriguez
*Celestino Uriarte. Klandestinitatea eta erresistentzia komunista.*
Juan Ramon Garai.

*Jokin Gorostidi. Autobiongrafia.*
Itziar Aizpurua.
*Balentxi. Hamalaugarren apostolua.*
Jexuxmari Zalakain.
*Bi marra arrosa.*
Jasone Osoro.
*Lurra, zorua bailitzan.*
Iñaki Petxarroman.
*Ez dugu nahi. Intsumisioaren ahotsak Euskal Herrian.*
Edurne Elizondo.
*Auzolanaren kultura: Iraganaren ondarea, orainaren lanabesa, etorkizunaren giltza*
Jasone Mitxeltorena
*Zamorako apaiz-Kartzela. Eliza eta Estatuaren presondegia (1969-1976)*
Hainbaten artean



Liburu hau,
ZAMORAKO APAIZ-KARTZELA. ELIZA ETA ESTATUAREN PRESONDEGIA
2011ko azaroan
amaitu zuten diseinatzen, konposatzen eta maketatzen
arte4cko atelierrean
eta horretarako Chris Burkek 1990ean
digitalki sortutako celeste familia tipografikoa erabili zuten.

